# DONOSTIAKO EGIA AUZOA

*Joseba INTXAUSTI*

## Egiatarrei bi hitz

*1998ko udaberrian, Etxearen zenbait ospakizun zela eta, Egia-Atotxako frantziskotarren komentuaren historia labur bat presta ote zitekeen galdetu zidaten. Asmoak ekar zezakeen lanaren zamaz gehiegi ohartu gabe, baietz erantzun nuen, eta orduan hartutako bideari jarraiki dator orain* Donostiako Egia Auzoa *deritzan idazlana, hau da, Auzoko eta Auzoaren historia laburtu bat.*

*Galdera edo eskaera hura, ordea, ohar jakin batekin heldu zitzaidan: Auzoaren egoera ezagututa, komeni zen idazkia elebiduna izatea. Egia esan, elebitasun hori nolakoa izan zitekeen ez zegoen orduan oso argi: Liburu osoan, bi hizkuntzatan testu bera errepikatuz, ala bakoitzean informazio ezberdin eta elkar-osagarriak emanez, esaterako.*

*Iradokizun haren emaitza dira bi testu bikiok: bata hau bera,* Donostiako Egia Auzoa *deritzana (eta* Buletin *honeta kaleratzen dena), eta bestea, berriz, Dk. Camino Institutuko monografia donostiarretan erdaraz azalduko dena:* Un Convento en la Ciudad. Crónica del siglo XX *deitu duguna.*

*Beti pentsatu izan dut, nahitaezko elebitasun ofizialetatik aparte, testu bat bera bi hizkuntzatan emateak ez garamatzala ezer zuzenetara euskararen normalizazioan, eta horrelako edizioek arruntki elebitasun endekatu bat dakarkigutela. Beraz, bestelako biderik hartzea erabaki nuen: Komentuarenari erdaraz heldu, eta Auzoko historiari euskaraz.*

*Donostian ez ditugu Auzoen historia asko; gehiago dira Hiri osoari begira egindako lan historiografikoak, beste azterlan berezituago horiek baino. Gainerakoen kasuan bezalatsu, Hiri osokoetan, ez da falta, noski, Egiari dagokion albisterik, eta, berehala ikusiko denez, hemen behin eta berriro baliatu gara langai horietaz.*

*Zenbait kasutan, Donostiako Auzoek izan dute beren nortasun aitorturik mendeetan zehar, eta arrazoi historiko eta hiritarrengatik ere badago horietaz zer esan. Bere aldetik, Hiriko historian halako nortasuna izan dutenetakoa da Egia, eta alde horixe da liburu honetan aztertuko duguna, bere urruneko sorburuetatik hasi eta gaur egunak arteko ibileran.*

*Liburuak bost atal nagusi ditu, ondoko itaun hauei erantzuteko: Zein izan da Auzo honen lekua Donostian, eta zein da berorren jatorrizko izaera, Erdi Arotik hona behintzat? Nolako aldakuntzak izan ditu baserriartetik bere hiritartasunera pasatzean? Zein da Egiako gizarte berria? Nola eratu da Auzoko biztanleria bere erakunde eta elkarteetan? Zein hizkuntza erabili izan ditu, eta zein da oraingo hizkuntz egoera?*

*Galdera larri horietan du liburu honek bere ardatza, Auzoaren nortasuna eta historia azaltzeko asmoz idatzi ditudan orrialdeotan.*

*Ezaguna da gaur egun Egiako auzotarrek nolako elkartasun-bilguneak dituzten, bertako biztanleei auzo-batasun bat emateko, kulturan bezala jaietan, zerbitzu sozial orokorretan bezala eliz bizitzan. Hori dena ez da izan bat-batean jaiotako zerbait, Auzoko belaun ezberdinek egindako ahaleginei esker sortutakoa baizik.*

*Esan nahi baita, Egiako gaurko egoera sozial ongi elkar-trabatu horrek bere historia izan duela, eta berorren berri ematen saiatuko naiz euskarazko liburu honetan, beste gisa batean, komentuaz diharduen erdarazko liburuan esandakoak borobilduz. Izan ere, Auzoa hain heldua ez zen garaietan, frantziskotarren eliz-komentuak aipatutako auzo-batasun horretarako bidea egiten lagundu zuen, bere elkarte eta lagunarteen bidez.*

*Donostiako gainerako Auzoak bezala, hein handi batean gaurko Egia ere jatorriz bertako eta kanpotiko etorkinez osatutako Auzoa da. Eta jatorburu ezberdinetatik auzo-lagunarte berera etorri diren gaurko egiatarrek, horrexegatik ere, beren historia ezagutu beharra daukate, egungoari eta beren geroari erroak emateko, seme-alaba eta iloba-bilobetan.*

*Egiatarren historia ezagutarazteko idatzi diren orrialdeok izan bitez, bada, bertakoen oroimen historikoaren sustagarri, berriz ere itxura-berritzen ari den Auzoak aspalditik datorrela, eta nondik datorren, jakin dezan*.*

* Ikerlan hau K.A. Euskal Fundazioaren laguntzari esker burutu da. Beroni eta Lehendaria duen Juan Zelaia jaunari nire eskerrik onenak emandako babes horregatik.

## Nota preliminar

El trabajo que sigue –*Donostiako Egia Auzoa*– es una síntesis de la historia del barrio donostiarra de Egia, antaño uno de los barrios rurales del Municipio y hoy integrado en su núcleo urbano. La narración alcanza desde su pasado más remoto hasta nuestros días, recogiendo su realidad pre-urbana y siguiéndola en su posterior transformación del siglo XX.

El texto tiene una pequeña historia que es preciso recordar. Invitado el autor, en 1997, a que investigara la historia de la Comunidad religiosa de los franciscanos de Atotxa, con la indicación expresa de que era conveniente un texto bilingüe, y convencido por mi parte de que, en publicaciones como ésta, un bilingüismo meramente duplicador es un calco inútil, aparte de costoso, opté por generar un doble relato, euskérico y castellano, en que se completaran entre sí ambos textos, sin repetirse.

Hice, pues, una elección clara: redactaría en castellano la historia del propio Convento, y narraría en euskera todo lo referente a lo que podía ser la contextualización urbana de la historia conventual, es decir, fundamentalmente la historia del Barrio en que está ubicada dicha Casa religiosa.

Consiguientemente, esta Historia de Egia, publicada en el presente número del *Boletín de Estudios Históricos de San Sebastián*, puede ser leída también conjuntamente con la otra obra que editará en breve el Instituto Dr. Camino Institutua de la Fundación Kutxa, en su serie de monografías donostiarras, bajo el título de *Un Convento en la Ciudad (Crónica del siglo XX)*.

La incidencia socio-religiosa de la Casa franciscana de Atotxa fue notable en el desenvolvimiento del Barrio de Egia a lo largo del siglo XX; y a la inversa: la vida de la Comunidad resultaría ininteligible sin esta referencia local. Si ambas observaciones valen en medida variable para las sucesivas décadas del siglo, puede afirmarse que son más particularmente válidas para los años 1940-1970.

El estudio que sigue se ordena en cinco apartados, atendiendo en primer lugar al mundo rural pre-urbano y a la construcción física de la nueva condición urbana emergente, describiendo a continuación su historia demográfica y social, para terminar presentando la articulación social urbana nacida del proceso descrito, en su aspecto asociativo y también en el lingüístico.

Los cinco apartados son, por tanto:

1. *Egia, Donostiako Auzoen artean*: Egia, entre los Barrios de San Sebastián.

2. *Baserriartetik Hirira*: Del mundo rural al urbano.

3. *Egia-atotxatarren Auzoa eta gizarte, 1800-1998*: El Barrio y la sociedad de los egia-atotxatarras.
4. *Egiako erakunde, elkarte eta taldeak*: Instituciones, asociaciones y grupos de Egia.
5. *Egiatarren hizkuntzak, 1986-1996*: Las lenguas de los egiatarras.

La presente exposición histórica concluye con el siglo: precisamente en el momento en que se coronaban multitud de mejoras desde el Alto de Egia hasta Tolaregoia, en un abanico urbano abierto; en los días del cierre del Campo Municipal de Atotxa y la edificación de viviendas a uno y otro lado del ferrocarril, más acá y más allá de la Estación del Norte; a la hora en que se abre el cuarto puente en Mundaitz; en vísperas de la gran reforma del Paseo del Duque de Mandas, y finalmente, a la espera del futuro que corresponda a la Tabacalera y quién sabe si a la vía férrea y al Puente Iztueta.

Desearía que esta mirada retrospectiva –recuerdo y evocación– sirviera a los egiatarras para entenderse mejor en sus raíces locales, en la dinámica de cambios vivida y en el acelerado desarrollo de las últimas décadas, o en el que aún está en curso.

Debo agradecer, naturalmente, a *K.A. Euskal Fundazioa* y su Presidente Sr. Juan Zelaia el apoyo prestado durante la elaboración del trabajo, y a *Kutxa Fundazioa* y a este su *Boletín* donostiarra, la acogida para esta edición. Mila esker, bihotzez.

## LEHEN PARTEA

### Egia, Donostiako Auzoen artean
### Egia, entre los Barrios de San Sebastián

Esta parte del artículo está consagrada a describir los orígenes del Barrio de Egia, situándolos en el contexto general de San Sebastián, constituida ésta no sólo por su núcleo urbano, acogido al monte Urgull, sino también por los numerosos barrios primitivos y el poblamiento disperso de su territorio.

Se ofrece una somera descripción del amplio territorio original, que alcanzaba mucho más allá de los actuales límites municipales. Se alude a las des-anexiones de varias poblaciones, episodios que se van escalonando desde el siglo XVII, con diversas y contrapuestas alternativas.

La San Sebastián primera, aquella anterior al s. XIX, se nos muestra muy rural, a pesar de que la historiografía más corriente haya destacado sobre todo el alto valor histórico y la significación estratégica del núcleo urbano, sobre todo como ciudad mercantil y militar.

Desde esta visión más general, se desciende a la historia y pasado del propio Barrio de Egia. Si desde el siglo XIX Atotxa –situada en la ladera baja, junto al río Urumea– tomó la delantera en la nombradía de los servicios que prestaba a la ciudad (no se olvide la Estación del Norte y su ferrocarril, los diversos centros de esparcimiento: plaza de toros, campo de fútbol; industrias varias, etc.), el Barrio donde Atotxa se enclavaba era mucho más extenso: la Egia histórica comprendió tradicionalmente toda la ribera derecha del Urumea, alcanzando al mar y hasta las laderas de Ulía. Primero, el desarrollo urbano-industrial (recuérdese, por ejemplo, el nacimiento del Barrio del Gros), y el ordenamiento del Plan General, después, han impuesto cambios sustanciales a aquella historia pasada. Atotxa misma entra de lleno en este contexto de cambios.

Esta primera parte del artículo se cierra con un recuerdo pormenorizado de los caseríos y casas de Egia que figuraban en la relación de 1862, y se presenta el balance final (1995) que sobre datos de Tellabide se puede ofrecer sobre las viviendas o edificaciones supervivientes de aquel pasado pre-urbano.

* * *

Egiako Auzoari begiratuko zaio ondoko orrialdeetan, Auzoaren historia labur bat aurkeztuz, hain zuzen Atotxako frantziskotarren komentu-etxeak eta, gero, parrokiak ere hor bete baitute beren historia.

Txilardegik Antiguari eskaini zion antzeko monografiarik apenas dagoen, tamalez, Donostiako beste auzoei buruz; orain gutxi Elejaldek ere eman digu Loiolari buruzko lana[1], baina Egiaz ez dut ezagutzen horien pareko argitalpenik. Hori dela eta, hutsune bat bete lezakete orrialde hauek.

Auzoaren berariazko historiarik ez izan arren, Egia ez da ahantzia izan Hiri osoari dagozkion monografiatan, horietan Auzoek izan duten lekuaren arabera behintzat. Zaharretan Camino eta berriagoetan R. Izagirre edo J. Tellabide, adibidez, aintzakotzat hartzekoak dira nahitaez, ikuspegi ezberdinetatik[2]. Han-hemenka ageri diren albiste jakingarri horiek biltzen ere saiatuko gara, ba, liburuan.

Egia bere baitatik ere hazia izan arren, hainbat hamarkadatan kanpotiko eraginek moldatu izan dute batez ere, eta lehenik eta behin Donostiako hedapen-indarrak baldintzatu du Egiaren hazkundea. Egiatarrak betidanik donostiarrak izan badira, inoiz baino donostiarragoak gertatu dira XX. mendean, herritartasun hori Hiri-erdigunearen ikuspuntutik balioztatu nahi badugu behintzat.

Barneko eta inguruetatiko gora-beharrak bultzatu du Egia-Atotxako eraikuntza fisikoa, Auzoa landa-baserrialdea izatetik guztiz hiritartzeraino, eta gaurko Egiako bizilagunentzat ez da erraza, Auzoko hiritartasun horren aurretik izandako Egia nolakoa izan ote zen antz ematea.

---

1. ALVAREZ ENPARANTZA “Txillardegi”, J. L. (1992): *Antigua 1900*. Donostia-San Sebastián: Kutxa. Albiste, xehetasun sozial eta argazkitan altxor aberatsa da hau. Bestalde, nire idazlan hau bukaturik zenean iritsi zait eskuetara, Loiolako Erretore Fernando Garijo jaunari esker, Elejalde-ren liburua: ELEJALDE ALDAMA, F. (1998): *“Behin batean Loiolan”. Pasado, presente y futuro de Loiola*. Donostia: Kutxa. Albistegi bizia da berau, eta Egia-Atotxarekin Loiolak duen hurbiltasunagatik gogoan hartzekoa. Hemen gaingiroki ukitutako hainbat puntutan gure lanaren osagarri ere izan daiteke berori. Maila apalago batean, eta beste gisa batez, Egiatik bertan dugun Altzak badu berrikitan bere liburua: ALTZAKO HISTORIA MINTEGIA 1988): *Altza. Hautsa kenduz*. Donostia: Liburutegi eta Kultur Etxeen Patronatua. Zertzelada jakingarririk bada beste honetan ere: LAZCANO, P. (1996): *Historia de San Sebastián, Altza e Intxaurrondo*. [Donostia].

2. Izagirre geroago izango dugu gogotan, eta Tellabideren liburua noski. Espreski Egiaz ari diren lantxo hauek ere ez genituzke galduta utzi nahi: TELLABIDE, J. (1994-1997): “Txurrutala”, “Astiñene eta Loiolako Zubia”, “Egia eta Tturkoene”, “Sibilia”, “Martikotxotegi”, “Mundaitz”, “Mantulene”, hurrenez hurren in: *Irutxulo* 1994-11-04, 29. z., 34. or.; 1994-12-30, 35. z., 33. or.; 1995-08-01, 65. z., 33. or.; 1996-05-31, 99. z., 33. or.; 1996-06-07, 100. z., 33. or; 1997-03-14, 133. z., 33. or.; 1997-04-11, 135. z., 33. or.

Aldakuntza luze hori, ordea, ez da inondik ere bat-batekoa izan, pausoz pauso egin, desegin eta berregin dena baizik. Gogoratu besterik ez dago, adibidez, zenbat kirol-eraikin izan den Auzoan, eta nolako joan-etorria izan duen horrek guztiak (azkeneko nagusiena aipatzeko, *Real*-aren Futbol-Zelaiari dagokiona, 1993an). Eta antzekorik franko izan da lantegitan, etxebizitzatan, mota guztietako zerbitzutan.

Eta Auzoko etxegintzaren ondoan, biztanleriari dagozkion harat-honatak; halaxe izan baita: batzuk joan, besteak etorri, eta etorkinak ere bigarrenez joan, nahiko sarritan hurrengo beste berriagoei leku egiteko.

Egia ez da izan bere buru-zilborrei begira egondako Auzoa. Aitzitik, hain zuzen, Hiri osoari (eta Probintziari ere) begira sortutako zenbait eskaintza bertarako baino areago kanporako izan da. Hori dena tarteko, Donostiako Egiak badu zer ikus eta zer konta bere buruaz eta inguruaz.

Era berean, Donostia osoari begiratu bat emateak lagundu egingo digu, Egia bere jatorrizko munduan lekutzen, eta hori da egin nahi duguna orain.

* * *

## 1. Donostiako herriak eta auzoak

Jakina denez, Donostia Hiriak bere baitan izan dituen herri, auzo eta baserrialdeak ez dira beti gaurkoak berak izan; Udalerriaren barrutia ere aldatuz joan da mendetan, berehala ikusiko dugunez.

### *1.1. Lurraldea: behinolako herri donostiarrak*

Hiriko historialariek beti gogorarazi dute, aurreko mendeetan Donostia zein lurralde zabala zen. Berrikitanago L. Silván-ek egin du Udalerriko lurraldetasunaren historia, hasi Hiri-Gutunak esaten zuenetik (*c*. 1180) eta gure egunak arte[3].

Aipatu Gutun edo Foruaren arabera, Donostiako lurraldea (partez ziurra, eta partez zalantzazkoa) Oriotik Hondarribiraino zabaldu izan da, Aduna eta Andoaindik Errenteria eta Iruneraino[4]. Geroztik historiak bere bidea egin du, eta aldakuntza aldakuntzaren gain etorri da, batzuetan aurreko egoera zuzentzeko, gehienbat urruneko herriguneei beregaintasuna aitortuz, baina baita herri beregainak berriro Udalerri donostiarrera bilduz ere.

---

3. SILVAN, L. (1971): *El término municipal de San Sebastián. Su evolución histórica*. San Sebastián: Dr. Camino. Ik. gainera: MURUGARREN, L. (1978): *San Sebastián - Donostia*. San Sebastián: CAM. 66-74.

4. Silván 1971: 33 (mapa).

Silván-en oharrak ahantzi gabe, Gorosabel-ek honela laburtu zuen, bere handi-mandian, Udalerri honen iragana[5]:

> *El término municipal de San Sebastián tenía en lo antiguo mucha extensión; pues comprendía todo el territorio de realengo que había desde Fuenterrabía hasta Orio, y desde el mar de Pasages hasta la villa de Arano en Navarra. Así resulta de la carta-puebla concedida por el rey D. Sancho el Sabio de este último reino por los años de 1180.*

Hainbat herri eta auzo biltzen zuen egoera hark, lurraldeko ekonomi eta gizarte-garapenekin batera nahitaez izan behar zuen aldarte eta gora-beherarik. Herriak beren udal nortasun osoa irabaziz joan ziren, batzutan ongi kostata izan baldin bazen ere: Astigarraga (1660), Alkiza (1731), Pasaia Donibane (1770, Hondarribitik banatua), Pasaia San Pedro (1805)[6], Aduna (1883). Altza 1821-1823. etan beregaina izan ondoren, Donostiara bildu zuten berriz, harik eta 1879an Donostiatik banatuta, Udalerri beregaina bilakatu zen arte; 1940an itzuli zen Donostiara, eta geroztik beronen barrutian egon da. Astigarraga ere, aldi eta gisa berean, Donostiara bildu zuten 1943an, baina berrikitan Udal beregaina gertatu da, bertako bizilagunen borondatez (1987)[7].

Guztion ondorioz, Donostiaren lurraldea murriztuz joan da, eta azken aldaketak gogoan izan gabe ere, Hiri-Gutunak egotzi zion lurraldetik bosten bat edo zen Donostiako Udalerriak gorde zuena, Astigarraga banatu aurretik.

Amodio eta higuinezko historia izan dute Hiriarekin inguruko herriok: Igeldo edo Altza, eta azken egunetan Astigarraga, ez dira elkartu edo banatu auzitarako gogo edo beharrik gabe[8]. Harreman korapilatsu horiek Gorosabel-ek gisa honetan deskribatu zituen, bere egunetakoa azalduz[9]:

> *Pertenecen a su jurisdicción los lugares de Aduna, Alza, Igueldo y una parte de la comunidad de Zubieta* […]*; y tiene los barrios extramurales de San Martín, Amara, Eguía, Loyola, Lugariz, Ulia e Ibaeta. También conserva jurisdicción con las villas de Hernani y Urnieta en el valle de Urumea.*

Hortaz, Donostiako biziguneak ez ziren mugatzen Urgull-peko Hirigune harresitura edo aipatutako herri gutxi-asko urrunagoetara, baizik eta bazen Hirigunearen bueltan hurbilago beste auzunerik, murruz kanpotik.

---

5. GOROSABEL, P. de (1862): *Diccionario histórico-geográfico... de Guipúzcoa*. Tolosa. 436.

6. Jose Bonapartek berriz ere Donostiara bildu zuen Pasaia, baina 1813an udal beregaintasuna eman zitzaion ostera. 1898tik aurrera hiru Pasaiek eta Trintxerpek beren arteko udal batasuna lotu zuten.

7. Silvan 1971: 54-59; ANABITARTE, B. (1903): *Gestión del Municipio de San Sebastián en el siglo XIX*. San Sebastián: F. Jornet. 197-199.

8. Anabitarte 1903): 197-199.

9. GOROSABEL 1862: 435.

### *1.2. Auzoak eta baserriarteak*

Banandu ziren herriak kenduta ere, Donostia ez zen izan inoiz baserri eta baserriarterik gabeko Udalerria. Bertatik bertara zituen bi Auzo txiki ere: Santa Katalina, Urumea ondoan (harik eta 1719an guztiz eraitsi zuten arte, bederen), eta San Martin, San Bartolomeko mendiaren pean, Kontxa aldera[10]. Hiri harresituaren segurtasuna zela-eta, eta gerrak tarteko, ez zuten patu onik izan auzuneok, baina hor egon ziren, eta oso bizirik egon ere, Murugarrenek erakutsi digunez.

Baina hiri harresitutik auzuneak ez ezik baserri sakabanatu asko ikus zitekeen inguruetan, Ordoñez-ek 1761eko Donostia hura deskribatu zuenean, zera esaten baitzuen, murruetatik irten orduko zer ikusten zen adierazteko[11]:

> *Sobre estos conventos y el de San Francisco, comienzan montes, riscos y breñas que corren muchas leguas, pero todos estos montes están habitables porque están sembrados de casas que aquí llaman caseríos donde se mantienen labradores con sus familias* [...]. Habrá mil caseríos en el contorno de tres leguas [...] (azpim. gurea da).

Hori horrela izanik ere, Donostiako udal barrutiko historia egin nahi izan denetan, hirigunea hartu izan da aztergaitzat batez ere. Hala nola, Histori Akademiaren hiztegira baldin bagoaz, Hiritik inguruetara begira Hiriko eta inguru herrietako 800 edo 900 baserri ikusten direla esan ondoren, idazleak harresietan bildurik izan den hirigunearen historia eman zigun bereziki, edo ia bakarrik, baserrialdeak kasik ahantzita[12].

Hala ere, 1862ko datu bat hona ekarri nahi bada, zera jakin dezakegu: Aduna (52 etxe), Altza (152), Igeldo (66) eta Zubieta (22) herriak albora utzita ere, eta hiriguneko eta bertatik hurbileko baserri-auzoak bakarrik aintzakotzat hartuta, 867 etxe zituen Donostiak bere udal barrutian: 394 etxe hirigunean bertan, eta 473 baserri inguruko auzoetan (hortaz, laurogeiren bat

---

10. Bi auzune hauen historia: Murugarren 1978: 159-162. MURUGARREN, L. (1986): *San Martín. Barrio y parroquia donostiarra. Donostiako auzune ta parrokia*. Donostia-San Sebastián: CAM. MURUGARREN, L. (1987): *Santa Katalina. Errebal eta portu baten kondaira laburra*. San Sebastián/Donostia: Eguisa.

11. ORDOÑEZ, J. (1963): *San Sebastián en 1761. Descripción de la ciudad, sus monumentos, usos y costumbres*. San Sebastián: Comité de Conmemoraciones Centenarias. 32-33.

12. REAL ACADEMIA DE LA HISTORIA (1802): *Diccionario geográfico-histórico de España. Sección I: Comprehende el Reyno de Navarra, Señorío de Vizcaya, y Provincias de Alava y Guipúacoa*. Madrid: Vda. J. Ibarra. s. v. “San Sebastián, ciudad”, *passim*, 303. Esandakoak ez du zalantzan jartzen kaletarrek, beren merkataritza eta jarrera hiritarrarekin izan zezaketen nagusitasun sozio-ekonomikoa, baina, hala ere, aintzakotzat hartzekoa da, Udalerriak zuen landatartasun hori.

baserri-etxe gehiago, kaleko guztiak baino). Agerian dago, ba, Donostiako bizilagun ez-kaletarren "hiritartasuna" oso nolabaitekoa zela[13].

Harresiz kanpoko Donostiako baserriarteen auzo-banaketak mendez mendeko historia izan du. Horren oihartzuna, agiritegietan ez ezik, argitalpen historiko ezagunetan ere aurki daiteke. Madoz-ek, esate baterako, bere hiztegian honela deskribatu zuen Hiriko baserri-auzoen hori (1850)[14]:

> *La pobl. rural está dividida en 6 valles y 4 pueblos anejos: valle de Ulía, valle de Eguía, pobl. de Alza a la der. del Urumea; valle de Loyola, de Amara, de Lugariz, de Ibaeta, pobl. de Igueldo a la izq. del Urumea; comunidad de Zubieta a la izq. del Oria, a leg. y media de dist. de la c.*; *l. de Aduna a la izq. del Oria, a 3 leg. de dist. de la misma. En esta pobl. rural se encuentran 765 casas de campo y de labor, la mayor parte de ellas muy espaciosas, de fáb. antigua de sillería y cantería con lagares para deshacer la manzana.*

Udalerriko testuinguru honetan, ba, ez gaitu harrituko Egia ere baserriarte sakabanatua zela jakiteak. Ikusiko dugu hori geroxeago.

Zerbait edo aski aldatuta izanik ere, Udalerriaren auzo-banaketa hau gure egunak arte luzatu da, eta udal- edo hauteskunde-barrutietan, nahiz Udal Erroldetan ageri zaigu, gisa modernoago batean[15].

## 2. Donostiako *Egia* eta *Atotxa*

Erro-errotik aldatu da, azken mende honetan, Egiako Auzoaren aurpegia, eta berorren barruan Atotxarena, funtsean zerbait guztiz berria izateraino.

Joan den mendearen erdi aldera (artean ez zegoen trenbiderik, ez ibai-ertzeko kanaleztapenik), ibai-bokaletik hasita Loiolarantz, Urumearen eskuinaldea padura zabalek estaltzen zuten. Bestalde, Egia Gainetik mal-

---

13. ALZATE, L. (1862): *Registro de la numeración de las casas urbanas y rurales de la Ciudad de San Sebastián y su distrito, en cumplimiento de la Instrucción aprobada el 24 Febrero 1860. Concluida el mes de Abril de 1862*. "Resultados" izenpean emandako datuak. (Eskuizkribua. Donostiako Udal Agiritegia. Sección D, Neg. 7, Libro 1).

14. MADOZ, P. (1850): *Diccionario geográfico-estadístico-histórico de España y sus posesiones de Ultramar*. Madrid. s. v. "San Sebastián" (1991ko *Gipuzkoa* deritzan edizioan, 195).

15. ANABITARTE, B. (1971): *Gestión del Municipio de San Sebastián (1900-1925)*. San Sebastián: Dr. Camino. 229, 233. Tradizio zaharrena eta ohikoena hautsiz, "Atotxa" bezala ageri da barrutia, eta horretako sail bezala "Egia" (Ulia eta Loiolarekin batera). 1996ko Udal Erroldan "Egia, Tolaregoia" barrutia ematen zaigu (hiriko 4. na bezala), hamar sailetan banatuta (7, 10, 11, 12, 13, 15, 16, 17, 18 eta 19. sailak), Gros eta Loiola-Zorroaga-Landarbaso barrutien artean.

dan behera, Donostiarantz, ez zegoen gaur ikus dezakegun eraikinik. Hiria, zinez, artean urrun zegoen, kilometrotara edo.

Mendez mende lur-barruti hau auzo eta baserriarte egiten zuten zeinuak kale eta plaza hiriztatuetan mozorroturik geratu zaizkigu, eta beroriek ezagutzekotan, bilatu egin behar izaten ditugu kaletarrok, topatu ez baititugu beste gabe agerian erraz topatzen.

Aitzitik, Auzoaz diharduten paper zaharrek zertzeladarik franko eskaini izan diete ikertzaileei, iragan erdi-galdu hori atzemateko, batzuetan Auzoko etxe gehienen albisteak egokiro bildu eta Auzo osoaz berriemate aberatsa eskueran jarriz.

Ondoko lerroetan bilduko ditugu guk ere Egia hiritarraren aurreko albisteak (hau da, baserriek osatzen zuten Egiako notiziak), Auzoaren leku-izena eta berorren adiera topografiko ezberdinak argitu ondoren.

### *2.1. Egia: izena eta izana*

“Egia” eta “Atotxa” leku-izenak historikoki jatorri hagitz ezberdinetatik datoz, eta horietako bakoitzak hiritar adiera ezberdinak izan ditu, hain zuzen tokiko errealitatea bera ere guztiz aldatuz joan delako eta horrek nahitaez izendegian bere eragina izan duelako.

Zenbaterainoko aldaketa izan den ikusteko egitate batzuk gogoratu besterik ez dago: Urumea ibaiaren kanaleztatzea, industrigintza modernoa, trenbidearen iristea, kirol- eta lantegi-garapen berriak, auzoko hirigintza orokorra. Denak izan dira Egia itxuraldatu dutenak, eta izanarekin, izenak ere harat-honat mugiarazi dituzten aldakuntzak.

Eta auzoko aurpegia aldatzean, eta gizon-emakumeak kanpotik etortzean (hortaz, oro har, bertan errorik izan gabe, auzoan beren egoitza hartzean), leku-izendegia ere murriztu edo ezabatu egin da sarritan egiatarren oroimenean, baita jatorriz bertako seme-alaba zirenen artean ere, eta, noski, etorri berriek arruntki ez dute ezeren albisterik jaso ahal izan. Galera horretan, bereziki ezabatzaileak izan dira 1940-1980. urteak.

Lurra bera, auzoko zorua bera, mugitzean, muga berriak sortu dira, etxadi berriak, bide-kamino zaharrak estali egin zaizkigu, eta berriak egin, eta hiztunek (erdaraz bezala euskaraz) izendegi berritze bat burutu dute. Hala ere, auzoaren izen nagusiak berean iraun du.

“Egia” tradizio luzeko izena da, Donostiako Auzoen artean.

Auzoari izen hori zergatik eman zaion galdetuko balitzaigu, zenbait zalantzarekin aurkituko ginateke. Batetik, tokiko baserri baten izenetik hartutako izen mailegatua dela esan izan da; horrela balitz, “Intxaurrondo”, “Berio”, “Igara” edo “Lugaritz” izenen pareko zerbait izango litzateke

“Egia”-ren kasua ere[16]. Iritzi horrek, ordea, baditu lausotasunak, Tellabidek bere izendegi-bilketa egitean, ez paperetan, ez bertakotarren lekukotasunetan aurkitu baitu “Egia” omen zeritzan baserri horren aztarnarik[17].

Izenaren erro etimologikoari gagozkiola, ordea, argitasun hobea dugu, *(h)egi* hitzak zuzenean deskribatzen baitu Auzo honi dagokion izaera topografikoa. Jakina denez, Egia beti izan da Urumea ibaiaren paduren gain zegoen muinoa, eta, hain zuzen, hitz honek euskaraz zera esan nahi izan du: ‘malda, aldapa, mendi-lerroa’[18]. “Egia”, ba, Auzoaren lekumenduari zuzenean dagokion deskribapena da.

Hitzaren jatorri hori hain argia izanik, ezin dugu beste hainbeste esan, “Egia” deritzan Donostiako Auzo horren muga-esanahiaz. Egiako barrutiak eta mugek zalantzarik franko izan baitute historian zehar. Horregatik, J. M. eta A. Sada-k ondoko oharpen hau egin digute Egiaren esanahi historiko-espazial aldakorraz[19]:

> *Se encuentra* [el Barrio de Egia*] situado en un alto, al Este de San Sebastián y, en principio, se conocía como tal a toda la zona ubicada en la orilla derecha del Urumea*. *– Limitado antiguamente por los barrios de Gros, Altza, Loiola y el río Urumea, ha quedado reducido, en nuestros días, a los terrenos comprendidos entre Atocha, Mundaiz, Loiola, Polloe, Intxaurrondo, Jai Alai, Gros e Iztueta*.

Tellabide-k, Egiako Auzoaldea eta Auzo-Barrutia bereiziz (azken honi esparru askoz zabalagoa aitortuz) ondoko deskribapena egin digu[20]:

> Barriada. *Se denomina* [Egia*] a la barriada que se levanta entre Atotxa y las proximidades de la antigua villa Toledo, y por extensión incluso hasta Polloe*.
>
> Barrio-Distrito-Partido. *Antiguo distrito de San Sebastián, de poca extensión*. *Ocupa la gran loma que se extiende al Oeste de Altza, a partir de*

---

16. SADA, J. M. (1985): *San Sebastián, calle a calle*. [San Sebastián]. 96, eta Sada/Sada-k birritan berretsi du iritzi bera, Egia Auzoaz eta Egiako Galtzaraz ari dela (SADA, J. M.; SADA, A. (1997) *San Sebastián*. *La historia de la Ciudad a través de sus barrios, calles, plazas, montes y caminos*. San Sebastián: Editorial Txertoa. 71).

17. TELLABIDE, J. (1995): *Donostiako toponimi erregistroa/Registro toponímico donostiarra*. Donostia: Dr. Camino. 89-90.

18. AZKUE, R. M. (1905) *Diccionario vasco-español-francés*. Bilbao. s. v. “egi”. MICHELENA, L. (1992) *Orotariko euskal hiztegia*. Bilbao: Euskaltzaindia. VI, 401: s. v. “hegi”. Azken honek ondoko adiera hauek jasotzen ditu: 1. Borde, orilla; extremo, límite: “línea de los montes” (Azkue). 2. Ladera; cuesta, pendiente. 3. Montagne, colline. 4. Cima. 5. Esquina, ángulo. 6. Lado, *alde*.; 7. Lugar, zona. 8. Alero de tejado. 9. Soportal, tejavana. Toponimian eta euskal deituretan *-egi* atzizkiak izan duen lekua ik. MICHELENA, L. (19733): *Apellidos vascos*. San Sebastián De. Txertoa. 80-81.

19. Sada/Sada 1997: 71.

20. Tellabide 1995: 89-90, 136.

*Lizardi* [último caserío, ya desaparecido, de Altza en los límites de San Sebastián] *hasta el río Urumea. Teniendo como límite septentrional el Distrito de Ulía y al sur el de Loyola.*

Beti esan izan denari jarraituz (baina berrikitan zerbait ahantzia zen hori gogoraraziz) autore berak Urumearen eskuinaldea beti Egia izan dela azpimarratu du, baita Loiola pareko ibai-eskuinaldea ere (bertako Kasernak Egiako lurretan eraiki zirela, beraz: 1921…). Zubirik ezean, edo berauen eskastasunaren ondorioz, ibaia zen Loiola eta Egiaren arteko muga-lerroa[21].

Hirigintzak Egiari arreta gehiagorik jarri dionean, Hiriko Plangintza Orokorrek ere definitu behar izan dute Auzoa (1996). Honela laburtu da hirigintza orokorrean Egiako barrutia[22]:

> Sector "Eguia". *Comprende las áreas urbanas situadas detrás del ferrocarril, entre Ategorrieta y Mundaiz. En él se incluyen Jai-Alai, Aldaconea, Atocha, Eguía, Parque Alcolea, Iruresoro y Polloe.*

Azkenik, bi iturri ofizial ditugu Egia zer den jakiteko: *Donostia Hiri-Ordenazioko Plan Orokorra. Egia: 1. Oraingo egoera. Mugaketa* (1995) eta 1996ko Udal Erroldak darabilen Hiri-barneko banaketa. Horietako bakoitzak, noski, bere ikuspuntu eta premietatik egin du Udalerriaren banaketa-sailkapena, eta segun zertarako nahi den, kasu bakoitzean jakin beharko da zein den izenaren esanahia.

Plan Orokorrean, Urumea eta gero Renfeko trenbidea dira Egiaren muga garbia, Mundaitzeko hegotik hasi eta Jai-Alaitik harago, Zubiaurre Pasealekuan autopistarako kaminoraino; hortik, Martikotxotegiko kirol-zelaiak ezkerrean utzita, muga-marra Polloeko kanpusantura doa, eta hau barne dela, Tturkoeneko Gainetik hilerri hegoaldeko baserri eta etxeak bilduz, Pinuetako Aldapa ttonttorrera hurbiltzen da muga, Aldapa Berri baino beheratxoago eta Loiolako Zubiraino jaitsi gabe, noski; ondoren, hortik, Alcolea azpitik eta berehala, ibaia ukitu gabe, Kristineneko Parkera doa, ibai-mugaraino helduz.

Historiari baino gehiago, Plan Orokorrak Hiriaren gobernabideari begiratu dio: Gros ez dago hor, eta Loiola pareko ibai eskuinaldeko lurrak ere galdu ditu Egiak. Azken hamarkadetako aldabidean, Loiolak eta Egiak, eremu-banaketa berria egin dute, egokiera berriek dakartzaten eskeei erantzuteko. Bere aldetik, Egiak atzean zuen mendi-malda hiriztatu egin du, Martikotxotegira ailegatuz eta Polloe-inguruetan Tolaregoiraino.

---

21. Tellabide 1995: 88, 90-92 (629. z.), 139.

22. VARII (1980): *Futuro urbanístico para la comarca de San Sebastián*. San Sebastián: Colegio de Arquitectos. 92.

Bestelakoa da 1996ko Erroldarena. Legeek eskatutakoei jarraiki, barruti (*distrito*) eta sailetan (*sección*) banatuta dago Udalerria. Batez ere balio estatistiko-demografikoa du Erroldak, eta ikuspegi honen arabera, Egia-Tolaregoiak 4. barrutia osatzen du, eta barruti honetan hamar sail daude, 13. 061 bizilagunekin. Laugarren barruti horretatik kanpo dago zenbait auzogune, Loiolakoekin eta beste barruti batera bilduta[23].

"Egia" izenari eman zaizkion adiera ezberdin hauetatik, ba, unean unerako baliagarri edo praktikoena erabiliko dugu orrialde hauetan, testuinguruaz argituz, edo espreski zertaz ari garen esanez.

### *2.2. Atotxa: izena eta sorburuak*

"Egia" izenaren ondoan, eta beronek duen esanahi aldakorrago horren ondoan, "Atotxa" izena askoz zehatzago eta doikiago erabilita ageri zaigu. Bestalde, dirudienez, biziki beranduagokoa eta tradizio laburragokoa da "Atotxa" hau, "Egia" baino.

Nondik sortutako izena den jakiteak baditu lanak hemen ere. Tellechea Idigoras-ek argitu berri digunez, Donostian bazen jada XVII. mendean Atotxatarren familia bat, Santiago Ordena Militarreko zaldunak ere izan zituena (1684, 1700). Atotxa deiturako hauek Erronkariko Garde herritik etorriak ziren, ez Euskal Herri kanpotik, eta paperetan 1651tik aurrera agertzen dira Donostian. Oraingoz, ordea, ez dakigu 1738az geroztik zein segida izan zuen sendiak, eta gutxiago oraindik abizen horrek leku-izenik eman zuenik[24].

Donostiarren artean izan zuen leku-izen honek bere historiatxoa, agian ez guztiz sinesgarria, baina bai Serapio Mujika bezalako historialari arretatsua berorretan errepararazteko lain izan zena (1916)[25]:

> *Se le conoce con este nombre* [Paseo de Atocha] *al que ocupa todo el frente del cuartel de San Francisco, antiguo convento, y sigue hasta la nueva fábrica de Tabacos, en donde comienza el Barrio de Eguía*. […]. *En San Sebastián la gente abandonó* [a partir de 1863] *el angostísimo espolón que al costado del camino a Oriamendi y Hernani, se levantaba en el* istmo*, y* [que] *desde el glasis de la ciudad amurallada conducía a la cuesta de San Bartolomé por el Barrio de San Martín, lleno de dunas, y se trasladó al Paseo de San Francisco*.

---

23. 1996ko Udal Errolda: "Definiciones".

24. TELLECHEA IDIGORAS, J. I. (2004): *Santiaguistas guipuzcoanos*. San Sebastián: Instituto Dr. Camino Institutua. 129-133.

25. MUGICA, S. (1916): *Las calles de San Sebastián. Explicación de sus nombres*. San Sebastián: CAM. 205.

Bi arrazoirengatik ekarri dugu hona testu hau: jaso duen lekukotasun historikoagatik, eta Egiako Auzoan lehendik bizi izandako tokiko tradizio frantziskotarra hartzen duelako. Murugarren-ek gogorarazi digunez, XVIII. mendetik zen ederra San Frantziskoko Pasealeku hori, "donde había más de mil árboles"[26].

Mujika berak esaten digunez, azpimarratutako aldakuntza horiek lehentxeagotik zetozen. 1846aren inguruan hasi zen entzuten Donostiako "Atotxa Pasealekuaren" ixtorioa, aitona zahar batek kontatu omen zionaren arabera[27]:

> *Entonces era frecuente oir como decían los Donostiarras, "también nosotros tenemos nuestro Atocha", aludiendo al paseo de este nombre en Madrid, llamado así por la iglesia dedicada a la Virgen de Atocha en aquel lugar. Entonces oí por primera vez y como nombre* popular *el de Atocha en mi ciudad natal.*

Dena den, S. Mujikak bildutako lekukotasun honen balio historikoa ez da onartu gero ezbairik gabe. Murugarren tokiko "Atotxa" baserri baten izenaz elestatu da, eta esan ere bai, berorri mailegaturiko izena duela Auzoak ere[28]. Berez, baieztapen honek (erbestetik etorri beharko lukeen baserri-izen honek, alegia) ez gintuzke harritu beharko, ugariak baitira kanpotiko mailegu-molde hauek euskal toponimian[29].

Euskal leku-izen bezala, baina Egiatik kanpo, "Atotxa"-k badu lekukorik: Lugaritz-Behean "Atotxa Erreka" daukagu, eta muino bati "Atotxa Errekako Gaina" deitu izan zaio. Tellabidek dioenez, Camino doktoreak "Atotxa" izeneko maiorazkoa aipatu zuen, Lugaritzen[30]. Baina, esan dezagun bukatzeko, toponimian arrotza ez izan arren, Egian bertan ez dela agiriztatu ahal izan "Atotxa" baserriaren hipotesia, eta, hortaz, berriz ere S. Mujika-ren lekukotasun harekin geratu beharrean izan gaitezkeela.

Egiako Atotxa izenaren sorburuak guztiz argitu gabe baldin baditugu ere, jendarteko ohituretan bada oraindik beste zalantzarik: Pasealeku hau lehenik "San Frantzisko" izan zen, eta geroztik "Atotxa Pasealekua" (erda-

---

26. Murugarren 1978: 187-188.

27. Múgica 1916: 205-206.

28. Murugarren 1978: 168.

29. Altzan (eta Usurbilen ere) bada "Paris" bat, eta hiru "Argel" ("Argel Aundi", "Argel Txiki" eta "Argel Etxeberria"); Urnietan, "Babiloni" bat. Era berean, "Bakio", "Balmaseda" edo "Tafallenea" izenek Ibaeta, Lugaritz edo Ulian har dezakete beren egoitza, edo "Granadak" Errezilen, eta molde beretsuan "Madriltxo" eta "Flamenkoene" Egiako baserriak izan daitezke. Eta geure hemengo historiara itzuliz, gogora daiteke "Villa Toledo" etxeak "Toledo-goya" izan zuela Egian bere aurretik. Ik. Alzate 1862: 35. or., 50. z. Cfr. Tellabide 1995: *passim*.

30. Tellabide 1995: 71.

raz, noski, plano eta liburuetan); baina bat-batean, 1926an, ofizialki "Paseo del Duque de Mandas" deitu zitzaion. Zergatik, ba, horrelako aldakuntzarik?

Fermín de Lasala y Collado (j. 1832) zen Mandas-ko Dukea. Diputatu, senadore eta enbaxadore izan zen Duke hori, eta hiltzean (1917) bere Liburutegia eta Kristineneko Parkea Donostiako Udalari utzi zizkion. Horra, ba, Egiako basagune hori nola bilakatu zen herritarrentzako ondare. Udalak, eskerronez, Pasealekuari ongilearen izena eman zion.

Hala ere, gaur arte, Donostian gehiago entzun da "Atotxa Pasealekua", Duque de Mandas-ena baino, eta, zalantzarik gabe, Futbol-Zelaiaren izenak egin du horretan indar, berau 1993 eta 1999etan itzali zaigun arte[31]. Frantziskotarren artean ere beste hainbeste gertatu da, eta berauentzat Donostiako komentu hau betiere "Atotxakoa" izan da, herritarren ohiturari jarraiki.

Horiek horrela, historia honetan ez dut uste deus larririk bortxatuko denik, ofizialtasunetatik landa, eta eguneroko usadioei segituz, "Egia-Atotxa" eta "Atotxa" bezalako izendapen-moldeak erabiltzen baditugu.

## 3. Hiriztatu aurreko Egia baserritarra

Hiri- eta industri aurreko Egia hura nekazari baserritarren mundua zen, Urumea ondoan egon zitezkeen bestelako lantegiek (errota edo olak, adibidez) izan zuten lekua ukatu gabe[32]. Etor zitezkeen aldakuntzak ez ziren barruntatzen ohiko baserri-bizimoduetatik. Eta, hala ere, Egiako tontorretik paisaia aldatzera ote zihoan ere susma zitekeen XIX. mendeko 60.az geroztik: Donostia harresietatik kanpo ateratzen ikusten baitzen, eta hedatzen ari zela. Eta, gainera, Egiako Auzora bertara ere iritsi berria zen trenbidea (1864). Halaz ere, Egia betiko Egia zen, artean.

### *3.1. Egiako baserriartea (1862)*

Baserriz nabartutako Egia hura, Egia Gainetik ibai-ondoko paduretaraino hedaturik zegoen. Gaurko irudimen hiritarrarentzat ez da samurra izaera hura irudikatzea: ibaia zabal eta eroso, kanaleztapenaren hesirik gabe, ertzetan hondarra, mareagora bakoitzean ura hara eta bestera sartzen zela.

---

31. Sada/Sada 1997:s. v. "Atocha, Campo de Fútbol de", "Mandas, Paseo del Duque de".

32. Ezaguna da Urumeako padura eta ibaiertzetan ola zaharrek izan zuten tokia (ik. CAMINO, J. A. (1963): *Historia de San Sebastián*. San Sebastián: Ayuntamiento de SS, 229: "…son superiores, y de las más famosas de Europa, las fábricas de anclas establecidas en las herrerías de Urumea"). Leku-izenetan ez da falta horren lekukorik: "Igola" baserria, eta inguruetako besterik.

Garaiko baserrien albisterik biltzeko, bada agiri eta iturririk; Egiako zaharrenen oroimenak ere lagundu du landa-etxe haien izendegia osatzen. Baina desagertutako baserrion kokagunea asmatzen lan zailagoa dago, asko baita desagertua, eta aztarna zehatz lekugarririk utzi gabe joandako zenbait ere bai[33].

Hala ere, orduko baserri-topografia emateko 1862ko Erregistroa daukagu, Lorentzo Altzate Udal Idazkariak egina; aparteko balioa aitortu izan zaio beroni, etxez etxeko zerrenda zenbakiztatua ematen duelako, eta bakoitza mapa-moldeko zirriborro batean lekutzen duelako. Iturri hori osatu eta azken berriak arreta osoz jaso dituena Tellabide-ren Donostiako toponimi erregistroa da, batez ere izendegiari begira egina, baina kartografia landu batez emana, hain zuzen gaurko hiri-egituren gain marraztua.

Bi lanek ere funtsezko balioa dute, eta irakurleak berorietako langaiak eskura izan ditzan dakartzagu hona; baina lehenengo lauki honetan 1862ko Erregistrokoak eman ditugu bakarrik[34]:

EGIA ZAHARREKO BASERRIAK (1862)[35]

| | |
|---|---|
| **1**. Flamencoene. | **18**. Concorre. |
| **2**. Recalde, o Erreca-alde. | **19**. Capitanene. |
| **3**. Iturri-berri. | **20**. Lachaga. |
| **4**. Chanponene. | **21**. Leriñene. |
| **5**. Madrilcho. | **22**. Cullasene. |
| **6**. Elchecho. | **23**. Polloe. |
| **7**. Cojoene. | **24**. Marticochotegui. |
| **8**. Atabalero. | **25**. Gabirostegui. |
| **9**. Blanqueador, o Arraunguillieta. | **26**. Echezar. |
| **10**. Tirritiene. | **27**. Olibasene. |
| **11**. Aldacoene. | **28**. Altamira. |
| **12**. Aldacoene-berri. | **29**. Iradiene. |
| **13**. Dambolin. | **30**. Erreca. |
| **14**. Eche-berri. | **31**. Ansuene. |
| **15**. Capitancho. | **32**. Confiteguille. |
| **16**. Anchume, o Anchuene. | **33**. Toledo-bea. |
| **17**. Buru-aundi. | **34**. Burgaene. (...) |

33. Hona, aipatu iturrien xehetasuna: Alzate 1862; Tellabide 1995; eta beste hau ere: Anabitarte 1971: 233.

34. Alzate 1862: 33-35. Erregistroak puntu zenbakiztatuz eman zuen etxe bakoitzaren kokagunea. Baliteke etxeetarik bat edo beste baserri ez izatea, eta baita laborari etxe ez ezik bestelako lanetan zebilenik izatea; baina, oro har, gehiengo handi oso bat baserriena dela pentsatu beharko da. Hemen laukian emango dugun zerrenda 34-35. orrialdeetan dago, juxtu horrelaxe emana.

35. Hona agiriaren irakurketan izan dugun zenbait arazo: 33 eta 50. *Toledo-bea* eta *Toledo-goya*: Tellabidek *Tolare* eta *Tolare-goi/Toledo-goya* bezala eman ditu. - 34. . . .

(...)

| | |
|---|---|
| **35**. Uretaene. | **52**. Lorencioene. |
| **36**. Lachaene. | **53**. Moscotegui. |
| **37**. Chicoene. | **54**. Sibilia-aundi. |
| **38**. Manuene. | **55**. Sibilia-chiqui. |
| **39**. Fábrica: Manuene (Torres). | **56**. Echecho |
| **40**. Torres. | **57**. Irola. |
| **41**. Zuloeta. | **58**. Tuniz. |
| **42**. Pilar. | **59**. Barasategui. |
| **43**. Pilar Cochera. | **60**. Zamarra. |
| **44**. Vista-ona, o Barraca. | **61**. Astiñene. |
| **45**. Mundáiz. | **62**. Mantulutene. |
| **46**. Errota-chiqui. | **63**. Potorro o Tolare. |
| **47**. Aldunaene. | **64**. Ezcurra. |
| **48**. Presa-buru. | **65**. Urdinzu. |
| **49**. Aldapa. | **66**. Urdinzu-bea. |
| **50**. Toledo-goya. | **67**. Obrador de Arsuaga. |
| **51**. Churco. | Píos establecimientos y su capilla |

Ikusten dugu, ba, zinez landa-mundu irekian gaudela Egia hartan; hala ere, hortxe bertan ageri da beste lanbidezko etxerik ere: *Atabalero, Chanponene, Blanqueador o Arraunguillieta, Confiteguille*, etab. *Astillene* bera ere **Astilleroene*-tik etorriko litzateke, Tellabideren ustez[36]. Torres baserriko lantegia gogoratuz (39/40 zenbakiduna), zera jaso daiteke Erret Akademiaren *Diccionario*-tik (1802)[37]:

> *Las fábricas que actualmente sobresalen más en San Sebastián son* […]*, de pañuelos y lienzos pintados en el caserío de Torres, donde se han pintado algunas banderas y gallardetes para la armada real, bien que ha decaido*.

Esan beharra dago, etxe eta baserrien izenek ez dutela hor euskal ahoskerari zegokion transkribapen doiturik (*Tturko* zen lekuan *Churco*, etab., eta izen bat berak aldakin erabili ezberdinak ere izan zitzakeela, gainera (Altzatek, adibidez, *-ene* atzizkia batzuetan jaso egin zuen, baina zenbaitetan kendu ere bai: *Churco, Ezcurra, Concorre* (entzunago ditugun beste hauen ordez: *Tturkoene, Ezkurrene* eta *Konkorrene*).

———

. . .

*Burgaene/Burgene*: Loiolakotzat dakar Tellabidek (*Burgene*). - 35. *Uretaene*: "Ubetene" (Tellabide). - 37. *Txikoene*: zalantzaren bat izan badugu ere, ez zaigu ageri irakurketa egokiagorik. Tellabidek ere badu Txikoene bat, baina Lugaritzen, eta ez Egian. - 59. Tellabidek *Baratzategi*. - 63. *Trotorro*: ustez irakurketa zuzena, baina ez zalantzarik gabea (Tellabidek *Potorrone* eta *Potorro* eman ditu: s. v. "Potorrone"). - 65/66. *Urdinzu/Urdinzu-bea*: Tellabidek *Urdintxo-bia* eta *Urdintxo-goya* ditu.

36. TELLABIDE, J. (1994): "Astiñene eta Loiolako Zubia", in: *Irutxulo*. 1994-12-30, 33. or.

37. *Diccionario 1802*: 316.

Azkenik, izen-aldakin ezberdinak ez ezik, elkarrengandik guztiz aldenduak ere izan dituzte Egiako baserriek, eta horien arteko izendapen-baliokidetasun erreala ezagutzea izan da Tellabideren ahaleginetako bat: *Potorrene, Tolare* ere izan zitekeen, edo *Kolkene* berdin *Presaburu*, eta *Tolare Garaikoa* baita *Toledo Goya* ere, etab. Bestalde, erran gabe doa, agiriek dakartzaten gisan jaso ditugula izenak, moldaera arauemaileetara ekarri gabe.

Izenak izen, gizarte bat ageri da izen horien azpian. Egiako Auzoan 67 etxe zeuden, zenbakiztatuak, eliz zereginetarako eraikinak kontatu gabe, Loiolak 44 eta Uliak 76 zituzten bitartean. Egiak Igeldoren tamaina ematen zuen, 66 etxe baitzituen honek. Amara (105) eta Lugaritz (93) zeuden dezente gainetik, baina Ulia estatistiken arabera gertu zegoen (76). Hirurogei urte geroago, Anabitartek ematen digun zerrendari kasu egiten badiogu, zenbakitan ez dago artean aldakuntza handirik: 60 edo 65 etxe ageri baitira Egian XIX. mendeko zerrenda horretan.

Baserri-mundua zen XIX. mende-erdialdeko hau, esan dugu, eta halatsu jarraiki zen ondoko hamarkadetan ere. Udalerriko eskolagintzaz dihardun albisteetan, edota hauteskunde-barrutiak sailkatu behar direla, baserriarteko esparruan ageri da Egia. 1872an bezala 1900. aren inguruan Egiako Eskola landatarren artean sailkatuta zegoen: *rural*-a zen[38].

1916 inguruan, berriz, S. Mujikak Loiola aipatzean garbiki esango du Auzo hori “formado exclusivamente de baserritarras” dela; baina ez zen, nonbait, hori bakarrik Egia, eta Auzoko ezaugarri bezala Hiriko zerbitzutarako jasotako eraikinak gogorarazi zituen batez ere Mujikak: Geltokia, Tabacalera, Eskola Normala, etab.[39]. Nolanahi ere, berritasunen haize berriek ez zituzten baserriak berehala erauzi, eta 1925ean, artean, hainbat zutik eta bizi ageri zen[40].

### *3.2. Iraganari atzera-begiratu bat (1995)*

Behin eta berriz aipatu dugu Tellabideren lana (1995). Beroni esker, Donostiako leku-izendegiaren bilduma zabala eskuetan dugu orain. Egiara begira gure irakurketa bat egiten saiatu gara liburu horretan, eta hauxe da jaso dugun uzta.

Inoiz bizileku izanik edo gaur egun horrelakoak direla, izen jakinen bat eman zaien etxe-bizitzak (baserri-etxe nahiz kalekoak) gogoan hartuz

---

38. Anabitarte 1903: 468.

39. MUGICA, S. (1916): *Provincia de Guipúzcoa*, in: CARRERAS Y CANDI, F. (s. d.): *Geografía General del País Vasco-Navarro*. Barcelona: A. Martín. 576.

40. Anabitarte 1971: 232-234.

osatu dugu zerrenda. Izenak gaurko grafia arautura ekarriak daude (aldakinak ere emanez), eta laukian bakoitzari Tellabiderenean duen zenbakia eman zaio, eta izaera ere aditzera eman dugu (baserria, etxebizitza arrunta, jauregia, lantegia, etab.). Azkenik, gogoan izan bedi zenbaki hutsez ez, baizik eta izen bereziz ezagututako bizilekuak bildu ditugula hona.

EGIAKO ETXEBIZITZA HISTORIKOAK ETA GAURKOAK (1995)

| *Izena* | *Beste izenik. Oharra* | *Zer zen/Orain zer den* |
|---|---|---|
| Aiton-amonak (28) | | Zahar-Etxe izana |
| Alcolea (56) | Pilar, Pilar de Egia (Ik. Villa Mercedes) | Klinika: M. Santos, Quirón |
| Aldakoene (58) | | Baserria |
| Aldakoene Berri (58) | | Baserria |
| Aldapa (61) | | Baserria |
| Aldapa Berri (62) | | Etxebizitza |
| Aldunaene (70) | | Baserria |
| Altamira (85) | | Baserria |
| Arraungillieta (249) | Blanqueador | Baserria |
| Astiñene (321) | | Baserria: bere indarrean |
| Atabalero (323) | | Baserria |
| Auntxene (341) | | Orain kale-bizitza |
| Buruaundi (544) | | Baserria |
| Danbolin (564) | | Etxebizitza |
| Eltxetxuene (611) | Eltxetxo | Baserria |
| Erizen Palaziyua (630) | | Jauregia: ik Urdinzu-goia |
| Errekalde (648) | Egiako Errekalde | Txokolate-fabrika |
| Errotatxiki (673) | | Baserri-errota |
| Etxetxo (726) | | Baserria: bere indarrean |
| Etxetxo txiki (727) | | Etxebizitza |
| Etxezar (729) | | Atseden-etxea omen |
| Ezkurrene (743) | Ezkurra | Baserria |
| Flamenkoene (750) | | Baserria |
| Gabirostegi (758) | | Baserria |
| Ibaialde (883) | | Etxebizitza |
| Igola (904) | Irola, Idola | Baserria |
| Igolatxo (905) | | Baserria: bere indarrean |
| Iradiene (944) | Iradi | Baserria |
| Iturriberri (975) | | Baserria |
| Kandidene (1040) | | Etxebizitza |
| Kapitanene (1052) | Kapitañene | Orain kale-bizitza |
| Kapitantxo (1053) | | Baserria |
| Kojaene (1091) | | Baserria |
| Kolkene (1093) | Presaburu, Zeziñategi | Baserria |
| Konkorrene (1096) | Konkorre | Baserria. Orain bilera-etxea |

| *Izena* | *Beste izenik. Oharra* | *Zer zen/Orain zer den* |
|---|---|---|
| Konpetilene (1099) | Konfitegilene | Baserria |
| Kristinenea (1118) | Gladysenea, Lasalene | Parkea |
| Kuilasene (1120) | | Orain kale-bizitza |
| Latxaene (1203) | | Baserria |
| Latxaga (1204) | | Orain kale-bizitza |
| Leriñene (1217) | | Baserria |
| Leriñene Berri (1218) | | Etxebizitza |
| Lizardi Berri (1238) | | Etxebizitza |
| Lopetedi Berri (1256) | | Etxebizitza |
| Lorentzio Txiki (1262) | Lorentzione Txiki | Etxebizitza |
| Lorentzione Aundi (1263) | | Baserria: bere indarrean |
| Madriltxo (1297) | | Baserria |
| Mantulene (1314) | Mantulutene | Baserria: bere indarrean |
| Manuene (1318) | | Baserria |
| Marrutxipi (1343) | (Uliakoa ez, Egiakoa zen) | Etxebizitza |
| Martikotxotegi (1348) | Martikostegi | Baserria |
| Misericordia (1435) | | Orain udal-biltegia |
| Moskotegi (1476) | Polloen zegoen | Baserri-jauregia |
| Mundaitz (1478) | | Jauregia. Ikastetxea |
| Mundaitz (1479) | | Baserria |
| Olibasene (1535) | | Baserria |
| Ollotei (1539) | | Baserria |
| Pilar Cochera (56) | Pilar del Hortelano | Baratzazain-etxea. Quirón ondoan. |
| Polloe (1649) | | Kanposantua |
| Polloe (1650) | | Baserria |
| Potorrone (1664) | | Baserria |
| Praentxiene (1665) | | Baserria: bere indarrean |
| Presaburu | Ik. Kolkene | |
| Tirritene (1803) | | Baserria |
| Tolabe (1808) | Toledo-bea | Baserria |
| Tolaregoi (1811) | Tolare Garaikoa<br>Toledo-goia | Baserria |
| Torres (1826) | | Baserria. Ondoan ehundegia (1802) |
| Tturkoene (1842) | Tturko | Baserri ederra: bota berria (1999). |
| Tuniz (1835) | | Baserria. (Altzan: Tuniz Etxea). |
| Tuniz-berri (1836) | | Etxebizitza |
| Txanponene (1856) | | Baserria |
| Txirita (1890) | | Etxebizitza: edaritegia |
| Ubetene (1927) | Ureta | Baserria |
| Udara Berri (1930) | | Etxebizitza |
| Urdintxo-behea (1960) | Urdinzu-bea | Baserria |
| Urdintxo-goia (1961) | Urdinzu, Urdinzo | Baserria |
| Villa Mercedes | Ik. Pilar Cochera | |
| Villa Toledo (1985) | | Jauregia. Zahar-Etxea |
| Xibili Aundi (1996) | Sibilia-aundia | Baserri ederra (1968an desagertua) |
| Xibili Txiki (1997) | Sibilia-txiki | Baserria |
| Zamarre (2014) | Zamarra | Baserria: bere indarrean |
| Zuloeta (2064) | | Baserria |

Lauki-zerrenda honek bere oharrak behar ditu. Baserri asko da hor ageri dena. Tellabideri jarraiki, esan dezagun 1995ean 12 baserri zirela, horietarik, artean zutik zeudenak: lau kale-etxe bihurtuak (*Auntxene, Latxaga, Kullasene, Kapitanene*), eta gainerakoak artean baserri gisan mantenduak (*Astiñene, Prantxiene, Igolatxo, Zamarre, Mantulene, Etxetxo, Lorentzione, Tturkoene*)[41]. Eta bada, Konkorrene bezalakorik, zeregin jasoagoetara pasatu denik: berau kultur eta bilera-etxe bihurtu baita, adibidez.

Tellabidek gogoratzen digunez, 1865ean 70 baserri zeuden Egian, eta, orain berrogei urte eskas, haietako bizilagunek bazuten elkarren laguntzarako ermandadea ere; baina 1936ko gerratearen ostean, 32 bakarrik ziren zutik iraun zutenak, eta aipatutako 12 horiek soilki 1995ean[42]. Geroztik Tturkoene ere desagertu da. Egian, Hiriko beste Auzoetako baserriena bezalatsu joan da hori: 1865-1940.etan 90 baserri desagertu ziren Donostian, eta 1940-1994. etan, ostera, 377.

Berrikitakoa da, ba, gehinbat baserri-galeraren azkartzea. Hainbat egiatarrek gogoan du oraindik 1960.etako Plangintzen ondorioz nola desagertu ziren Martikotxotegi, Sibilia Txiki eta Haundi, Tuniz eta Tuniz Berri, etab.[43]. Azkenik, etxagintza berriek irentsi dute ia dena.

---

41. Tellabide 1995: *Irutxulo*, 95-08-01, 33.
42. Tellabide 1995: *Irutxulo*, 95-08-01, 33.
43. Tellabide 1996: *Irutxulo*, 96-05-31, 33.

## Bigarren Partea

## Baserriartetik Hirira - Del mundo rural al urbano

Esta segunda parte aspira a ofrecer una síntesis del proceso urbanístico de Egia, dentro de los cambios que en el mismo sentido se van a ir imponiendo en San Sebastián desde 1863 (fecha del derribo de la muralla). En varios aspectos Egia siguió de cerca dicha transformación.

Egia se nos presenta, de inmediato, muy al servicio de las demandas generadas por el antiguo casco urbano y el Ensanche que es la prolongación de aquél, acercándose físicamente al proceso por sucesivos puentes nuevos; pero, con una duplicidad paradójica, reafirmando con la Estación esa vocación de servicio a la Ciudad, mientras, para la vida cotidiana, la vía férrea significaba el alejamiento de los vecinos egiatarras, del núcleo urbano.

En la afirmación creciente de la condición urbana de Egia, el río Urumea y la paralela vía férrea han sido reto al que hacer frente, una y otra vez, de uno y otro modo. No obstante la "lejanía" impuesta por ambos hechos, Egia es el Barrio que ofrece mejores prestaciones a la Ciudad, antes de que lo hiciera el Gros y mucho antes que Amara: el cementerio (1875), centros deportivos (desde 1877), el Parque de Cristina-Enea (1917), la Universidad de Deusto (ESTE, EUTG: 1961), etc.

Esas son realidades que tomaron cuerpo activo en el Barrio, pero hubo también o existen Proyectos para un Egia imaginado: el Plan de Matxinbarrena (1942) y el Plan General de Ordenación Urbana (1995), con el Plan Especial para Atotxa (1996). Bastantes de los propósitos apuntados han llegado ya a buen puerto; otros, quizá más imaginativos, no.

* * *

### 1. Donostia: Hiri itxi bildutik inguru irekira

1863ko data une erabakigarria izan zen Donostiaren historian, hirigunea inguratzen zuen harresia hautsi eta kanpora hedatzen hastea erabaki baitzen urte hartan. Beste hiri askotan bezala (gogora Baiona, Bilbo, Gasteiz edo Iruñea, Euskal Herrian), XIX. mendeko hazkundeak murru zaharrak hautsi eta hirietako mugaldeak gisa berri batez antolatzea eskatu zuen Donostian ere. Egoera zaharretik berrirako pasaera honek, noski, murruz kanpoko auzoen izan-moldea nahitaez ukitu zuen, eta, horregatik, Donostian gertatutakoaz zerbait esan beharra daukagu, Egiakoari berari heldu aurretik.

### *1.1. Iragan urrunetik hedapen berrietara*

Mendez mende, Donostia penintsula bat zen, Kontxako uren eta Urumea ibaiaren artean hartua, eta Urgull mendiari lotuta zegoena. Historialariek ere horrelaxe deskribatu zuten[1]:

> *De esta manera, no distando entre sí más de un tiro largo de fusil los dos brazos de mar que bañan ambos muros del Oriente [Urumea-aldeko murruak] y Poniente [portu-aldekoak], viene a reducirse el pueblo, juntamente con la montaña que le hace espaldas por la banda del Norte, a una perfecta península...*

Halako tentuz eta sen onez lan egindako R. Izagirrek gehiago erakutsi du bere ikerlan ezagunean: Donostia lehenago batean irla bat izan zela, Urgull mendiari itsatsia, nahiz eta Hiri-Gutuna eman zitzaionerako penintsula bilakaturik zen[2].

Horrela bizi izan zen Donostia, 939an lehenengoz aipatua, 1180aren inguruetan Hiribildu-Forua eman zitzaionetik Aro Garaikidea arte. Tartean, gerrak eta suteak ere izan zituen, eta hauetako batzuek osorik erre zuten herria (1397, 1489 edo 1813an, etab.).

Donostia gotorleku armatu eta merkatal hiria izan zen, biak, eta zeregin bikoitz horrek zekartzan interes kontrajarrien gatazkak mugatu zizkion bizitza eta bere hazkundea Donostiari. Hala ere, ikusi dugu, nola Donostiako bizilagunetarik erdia baino gehiago landa-baserrietan bizi zen, artean XIX. mendean. Horrek ez du esan nahi, ordea, Hiriko dinamikarik bizkorrena erdiguneko Hiri harresitutik kanpo zegoenik[3].

1863an, ba, murruak behera botatzearekin batera merkatal hiriari ateak zabalik uztea erabaki zen batez ere, eta handik hamarkada batzuetara, baita Hiriburuetako zeregin administratiboei eta udaleku modernoetako zerbitzuei ere garapen-gune bat eskaintzea. XIX. mendeko bigarren partean, Donostiak bere Hedaguneak sustatu zituen, kanpotarrei atseden-leku bezala eskaini zien bere burua, eta, azkenik, Udalerriko padurak lur-lehortu, bide berriak urratu eta Hiriaren proiektu berri bati ekin zion.

---

1. CAMINO, J.A. DEL (1963): *Historia cicil-diplomático-eclesiástica anciana y moderna de la ciudad de San Sebastián*. San Sebastián: Ayuntamiento de SS. 14.

2. IZAGUIRRE, R. (1933): *El Urumea y los puertos donostiarras*. Pasajes de San Pedro: Editorial Vasconia. *Passim*, 41.

3. URBANISTES ASSOCIATS (1978a): *Plan General Municipal de Ordenación de San Sebastián. Estructura y crecimiento urbano*. San Sebastián (ed. fotokopiatua). 210, 227. GOMEZ PIÑEIRO, F. (1982): *San Sebastián y su área periférica*. San Sebastián: [CAP]. I, 51, 107. ID. (1984): *Aproximación a la geografía social y urbana de la comarca donostiarra*. San Sebastián: Grupo Dr. Camino.



Egia **Auzoa**: maldan gorako pendiza. Etxeak horrelaxe metatu dira elkarren ondoan, kasik bata bestearen gain. Etxegintzak, izan ere, tontorrean (Tolaregoian) edo behealdean (Atotxan) bakarrik du sosegu zabal hoberik.

Ez zuen Hiriak jokabide hori bere baitatik bakarrik lagundu, eta Probintziak izan zuen hor lekurik, eta urrunagoko interesek ere. XVIII.aren azkenetan irekia zen Oriamendin zehar Hernanirako bide erosoagoa (ez da ahantzi behar, artean errepide nagusia, Madriletik Frantziarakoa, Hernanitik zihoala, Donostia albora utzita).

Oriamendiko hori bazen zerbait, baina mende-erdi bat geroago emandako pausua mugarri bat gertatuko zitzaion Donostiari (1847): urte honetan Madril-Irungo errepide nagusi berria Donostiaraino iritsi zen, artean zutik zeuden murruen ondo-ondoraino[4]. Berehalaxe, 1854an, Probintziako hiriburu bilakatu zen Donostia, eta 1864an trenbidea Urumeako eskuinalde donostiarrera heldu zen. Horra, ba, hogei urte eskasen buruan, Urgull-pean kuzkurturik bizi izandako Hiria mundutik inoiz baino hurbilago.

Egokiera berrien aurrean Donostiak etorkizunari aurrea hartu nahi izan zion, eta Hedaguneak aurreikusi zituen irtenbiderik egokien bezala, Hiri-Hedagune aurrez arautuak alegia. Egia da, ongi azpimarratu den bezala, hirigintza garaikide hau ez dela Hedagune programatuetara mugatu, edo

4. Errepide nagusiaren arazoaz: Madoz 1850: 197.

Donostian onartu diren Hirigintza-Plangintzak ez direla, hurrik eman ere, errealitateraino iritsi[5]. Baina egia da, bestalde, Donostiaren aurpegirik ezagunena, erakargarriena, eta, azken finean, gainerako guztia mugiarazteko balio izan duena sarritan Hedagune-Plangintza haiek izan direla. Oro har esan daiteke, Hedaguneetako plangintzak emaitza nabariak utzi zituela Donostian, eta berorietatik urrundutako Auzoetan plangintzak ez zuela orain oso gutxi arte eragin nabaririk izan.

Donostiako Hirigintza modernoan komeni da ordenamendu kronologikoari begiratzea, Egiako historia bera uler dezagun ere bazter-ezina baita hori[6]. Cañamero-k honela epekatu du Donostiako Hirigintza modernoaren historia: Hedaguneen Hiria (1850-1950), Hazkunde mantsoko epea (1940-1962), Ordenamendutik geldialdira (1962-1980), Azkenaldiko garapena (1980-1998). Gómez Piñeirok, historia hori zerbait lehenagotik hartuz, nahiago izan du bost epetako beste kronologia hau: 1) XIX. mendearen aurreko eraikuntza. 2) Sute-ondoko lehen eraikuntza (1813-1863). 3) Hedaguneen eraikuntza, azpiegitura berriak eta Auzoetako zenbait eraikin (1863-1950). 4) Hiriko Lehen Plangintza Orokorra (1950-1962). 5) Donostiako Hiri-Ordenamendurako Plangintzaren ondokoak (1962-…)[7].

Funtsezko adostasun bat dago bi epekapen hauen artean: bere handimandian, 1850-1950.etako mende beteak batasuna du Hirigintzaren aldetik, eta handik hona bi Ordenamendu nagusiak (1950, 1962) dira Hirigintza horretako mugarri, agindu eta arauz ezarri dutenagatik baino gehiago berezko garapen sozio-hiritarrak epe horietan izan dituzten ezaugarri eta lorpenengatik. Geroago ikusiko dugu 1995eko Plangintza Orokorra.

Kronologia horretan lekutu behar da, ongi konprenitzeko, Egiako Hirigintza ere, eta, hona ezkero, komeni zaigu Hiri-garapen orokor horretatik Egiari zuzenago datxekiona hona ekartzea.

---

5. Teorikari eta aztertzaile batek baino gehiagok azpimarratu du Donostiako Hirigintzan Plangintzetatik zinez errealitatean gorputz-mamitu den Hiriraino dagoen tarte zabala: ik. VARII (1980): "La ciudad capital de Guipúzcoa y su periferia", in: VARII: *Futuro urbanístico 1980*: 133-141; Gómez Piñeiro 1982: I, 116-117; interesgarria da Hedaguneen Plangintzei beren lekua emateko: GALARRAGA, I. (1994): "El plano de Donostia, imagen de la ciudad", in: AYERBE, E. (1994): *Donostia-San Sebastián*. San Sebastián: Sendoa Argitaldaria; A. Cañamero-k azpimarratu du, besteak beste, Hirigintzaren benetako anarkia praktikoa: CAÑAMERO, A. 1994): "El desarrollo de Donostia. Geografía urbana. Espacio y población", in: Ayerbe 1994: 72-77.

6. Kronologia xehe eta zehaztu bat nahi duenak VARII 1980an aurki dezake: 55-88, urtez urte doala.

7. GÓMEZ PIÑEIRO 1982: I, 104; Cañamero 1994: *passim*.

### *1.2. Hedaguneak, eta bestelako hiri-garapenak*

Hirigune zentraletik, bertatik bertara hurbil dituen esparruetara zabaltzeko aurreikusi eta arautatako garapenei deitu izan zaie Hedaguneak (*Ensanches*).

Honelako Plangintzetan Donostiakoak izan zituen lehenagotik beste hiritan antzekoak. Hedagune hauetako klasikoenak XIX. mendeko bigarren partean hasi eta azkartu ziren (Paris: Haussmann, 1853-1869; Barcelona: Cerdá, 1860; Madril: Castro, 1860), eta Donostian, murruak urratzearekin batera jarri zen Hiriko Hedagune hauen asmoa abian (1863), Kortazar-en Heda-Plangintzari bide emanez.

Horrek zer esan nahi zuen? Lehendabizi, Amararantz abiatuz garai bateko harresi barneko 10 Ha haiek ia 80 Ha-taraino hedaraztea (1865), batez ere itsasoari eta ibai-ertzei kenduko zitzaizkien lurrei esker. Bigarren, irabazitako esparru horretan, hiri-ordenamendu bat aldez aurretik arautua ezartzea, unean uneko zuzenketak ere eginez[8]. Horren ondoren, 1894tik aurrera, Goikoa-ren Groserako Heda-Plangintza dator, itsasaldeko Egia historikoa ere hartuz, baina geroko Egia moderno hiriztatuaren barrutira sartu gabe.

Bulevarretik Askatasunaren Etorbiderainoko hirigintza XIX. mendearen azken herenean egin zen, urratsez urrats[9]: Gipuzkoa Plaza (1865), Bretxa (1870), Aldundia (1879), eta geroago San Martingo Azoka (1890), Kasino/Udala (1887), Artzain Ona (1897). Hortik Amararantz mantsoago joan zen hiriko zabalkuntza[10].

Hori guztia gorabehera, XIX.aren amaieran Groseko Auzoa gehiago zen artean asmo eta proiektu eder bat, zerbait osatu eta eraikia baino, izan ere urrun baitzegoen hirigune nagusitik, tarteko Zurriola Zubirik gabe. Groseko lanak batez ere 1909tik aurrera mugitu ziren bizkorrago, harik eta hirugarren zubi hori 1921ean eta Kursaal Kasinoa 1922an bukatu ziren arte[11]. Ez gaitu berantasun horrek sobera harrituko, ibai ezkerraldean Victoria Eugenia eta Maria Cristina Hotela 1912an ireki zirela gogoratzen badugu.

---

8. GÓMEZ PIÑEIRO 1982: I, 104, 108, 114. Kortazar Plangintzaren analisia, eta berorren ondoko zuzenketena, ezagutzeko, ik.: Galarraga 1994: 54 eta hurr.

9. GRANDIO, J. (1987): *Urbanismo y arquitectura ecléctica en San Sebastián. 1890-1910*. San Sebastián: CAM. 38.

10. Donostiako hirigintzaren garapen-historia ezagutzeko azalpen labur bat: UNZURRUNZAGA, X. (1985): “La arquitectura y el urbanismo en el siglo XX”, in: INTXAUSTI, J. (ed.) (1985): *Euskal Herria. Realidad y Proyecto*. San Sebastián: Jakin. 55-66. Une honetako historia laburtua: BERRUEZO, J. (1989): *Cien años de vida de San Sebastián (1879-1979)*. San Sebastián: CAM. 68-69, 73-74, 81-82.

11. MÚGICA 1916: XXXVI-XXXVII. or.; RODRIGUEZ SORONDO, M. C. (1985): *Arquitectura Pública en la ciudad de San Sebastián (1813-1922)*. San Sebastián: CAM. 136; Anabitarte 1903: 235-236.

1867 eta 1910 artean eraiki zen gaurko hiri modernoko zentrua, eta 1925ean edo Artzain Onaren inguruetakoa bizkortu zen (San Martin, Prim)[12]. Hiriko garapen hau garaiko argazkitan ezagutu nahi duenak, T. de Izaro-ren lanean izan dezake parada onik[13].

1920-1930. urteetan zabalgune osagarriak datoz: Grosen, hondartza aldera, eta Ondarretan, txalet eraikuntzak[14]. Era berean, 1910.etako azken urteetatik aurrera Urumeako eskuinaldeak ere hiri-garapen erresidentzialak ezagutu zituen.

Gerraondoan, 1950era edo hurbiltzean, Donostia osoak 407 Ha ditu hiriztatuta, 140.000 bizilagunekin: 1850etik aurrera egindako jauzia itzela da, beraz[15]. Horregatik, 1950 inguruko egoeraz balantze hau egin da[16]:

> *Al terminar esta etapa se observa una casi total colmatación del suelo llano de la ciudad, habiéndose ganado numerosos terrenos a las marismas y al mar, y edificándose en las laderas y pendientes. No hay, sin embargo, una planificación global, y el crecimiento está guiado principalmente por la demanda inmediata.*

Plangintza eskasia Amara Zaharrean, Antiguan eta Egian sumatzen zen, batez ere[17]. Zeuden hutsuneak betetzeko, eta garapen berriei bide emateko, Bidagor arkitekto donostiarra izango da gizon ardatza. Hirigintza-Zuzendaria zen Madrilen, eta Aldundiaren eskeari ihardetsiz, “Plan de Ordenación de la Provincia de Guipúzcoa” bat prestatu zuen (1942).

Donostia ongi ezagutzen zuenez, saiatu zen beroni irtenbide berria asmatzen. Proposamen interesgarria da hauxe, orain berrogeita hamar urte arkitekto batek bere Hiri sorterria nola amesten zuen jakiteko, eta ondoren etorri zaizkigunekin alderatzeko[18]. Proposamen hura ez zen errealitatera pasa, baina Bidagor berak bigarren aukera, oraingoan emankorragoa, 1950ean izan zuen, Udalaren eskariz “Plan de Ordenación de San Sebastián y su zona de influencia” idaztean, eta Udalak argitara ematean (1951)[19].

---

12. GÓMEZ PIÑEIRO 1982: I, 112.

13. IZARO, T. DE (1979): “Recuerdos de nuestra ciudad”, in: VARII (1979): *Cien años al servicio de Guipúzcoa*. San Sebastián: CAM de San Sebastián. 56-79.

14. Urbanistes Associats 1978a: 211.

15. GÓMEZ PIÑEIRO 1982: I, 114.

16. GÓMEZ PIÑEIRO 1982: I, 112.

17. GÓMEZ PIÑEIRO 1982: I, 112.

18. Probintziari, eta Donostiari ere, zegokiena ezagutzeko, ikus laburpen testuala: VARII, *Futuro urnabístico 1980*: 133-137. Aireportua, adibidez, Astigarragan egitea proposatzen zuen Plangintzak.

19. VARII: *Futuro urbanístico 1980*: 139-141.

Ondoko urteetakoak dira Amara Berriko padura zaharren lehorreztatzea eta Ospitaleetako eraikinak jasotzea, adibidez[20]. Gainerakoan, eraikileek eskuak nahiko libre izan zituzten proposamenak egin eta zerizkien bideetatik eramateko ere.

Hurrengo pausu orokorra Alustiza arkitektoak buruturiko “Plan General de Ordenación Urbana de San Sebastián” izan zen (1962)[21]. Garapen-grinaren urteak dira, eta hamar urteko goraldia du ekonomiak, eta etorkinak ugari datoz, 1970.etako krisia agertu arte. Amara Berriari beste bultzada bat eman zitzaion, Anoetako kiroldegi handiekin batera, eta etxebizitzen eraikin erraldoiak datoz Auzoetan (Intxaurrondo, Herrera, Altza, etab.). Egia ere ez zen hortik libratuko. Zinez, Hiriko lur librea eraikin bihurtu zen: Donostiak 1960an zituen 550 Ha hiriztatuei beste 330 Ha berri gehitu zitzaizkion 1972rako: %60ko hazkundea[22].

Krisi ekonomikoa gainean zelarik, 1976an Plangintza Orokorraren berrikustea proposatu zen, ordura arte gertatutako hazkunde nahasi eta nahastaileari, garai berrietarako, irtenbide hoberik bilatzeko. Besteak beste, Egiari begira ere ordenamendu apur bat sartu nahi izan zuen Plangintza berritu honek[23]. Azkenik, 1995eko Plan Orokorrak, iraganaz zeuden kritikei eta etorkizunaz egindako galderei erantzun nahi izan die.

Azken hamabost-hogei urteetan, Donostiak Auzo berriak ditu bere hirigintzaren barnean, eta hauetako batzuk osorik aurreikuspen zehatzen fruitu dira, gainera (Errotaburu, Berio, edo Intxaurrondo berria). Eta Auzo zaharretan hainbat moldaketa egin da, eta inoiz, geratzen ziren hutsarteak bete ere egin dira hauetan (Amaran, adibidez). Zenbait hirigune endekatu edo gaizki moldatutan, birmoldaketa-lan franko egin da, bide batez zeuden hutsarteez ere baliatuz (Antiguan, etab.). Lehenagotik gaizki egindakoen kontzientzia, krisi ekonomikoa, biztanleriaren beheraldia eta etxebizitzen politika berria izan dira prozesu berri hauen protagonista eta eragileak[24]. Egiari ere egokitu zaio une honetan bere egitura zerbait hobetzea, baina hori beste kapitulu bat da hemen.

Hazkundearen gorabide horretan, ordea, Donostiako Hiria ez da beti eta nonahi herri eroso, txukun eta amesgarria izan, eta hori ere gogorarazi beharra dago. Donostia ongi ezagutu eta berau hobetzen ahalegindu zen

---

20. GÓMEZ PIÑEIRO 1982: I, 115; VARII: *Futuro urbanístico 1980*: 83.

21. Urbanistes Associats 1978a: 230; VARII: *Futuro urbanístico 1980*: 144; Gómez Piñeiro 1982: I, 115-117.

22. Urbanistes Associats 1978a: 224. Urte horietakoaren laburpena: Gómez Piñeiro 1982: I, 118-119.

23. GÓMEZ PIÑEIRO 1982: I, 117.

24. CAÑAMERO 1994: 76.

Matxinbarrenak honela deskribatu zituen hiriko flakeziak, hain zuzen Atotxako frantziskotarren komentua sortu zen urteak burura ekarriz[25]:

> *En el año 1921, San Sebastián era, como hoy* [1945], *una coqueta y bien urbanizada ciudad, sólo que con la mitad de población. Sin embargo, su contemplación hoy nos produciría desencanto. Recordemos un poco el panorama. Las calles limpias, sin duda (tal vez más que hoy), se hallaban todas revestidas con un pavimiento de viejo y desperfilado adoquín.*
>
> *En los barrios de Atocha, Gros, Eguía, Antiguo, etc., las calles, paseos y carreteras más importantes tenían sus calzadas en verano, y de barro, en invierno, y las aceras y espolones con piso de tierra.*

Hiri moderno eta ongi egokitua egitea ez zen ardura makala, ondoenik zetozen Hedagune txukunenetan ere; are gutxiago Auzo galdu edo erdi galduetan. Horretarako ez ziren beti eskura egon premiazko baliabide ekonomikoak, eta inguruetako izaera topografikoa ere erapozpen serioa izan zen. Horietakoxe bat aipatuko dugu hemen bereziki, Egiaren etorkizunarekin izan zuen zerikusiagatik.

Hiriko Hedapen-Proiektuetatik begiratuta, eta Egiako begira-puntutik ikusita batik bat, Donostiaren hazkunde honek muga-marra fisiko eta topografikoekin ere egin du estropezu. Eta hauetako bat, ez txikiena, Urumea ibaiko lerro-muga izan da, Egia beti egon izan baita ibaiaren beste aldean. Horrek Auzorako izan duen munta nabaria da, eta Egiako hirigintzaren historiari berari heldu aurretik ongi etorriko zaigu hiriko ibai nagusi honetaz berriren bat ematea.

### *1.3. Urumea hezikaitza*

Mendi-kateek bezala ibaiek ere, beren mugatasunean balio bikoitza eta kontrajarria izan dute: alde batetik, muga eta banatzaile izan dira, eta bestetik, bi alde edo ertzen arteko baldintzak aldatuz gero (interesak, baliabide teknikoak, hurbiltasun ekonomiko, sozial edo kulturalak), mendiarteak kideko bizimolde berdinduak sortu izan ditu bi aldeetan (Pirinioetako kasua Estatu-arteko mugaldeetan, edo Gipuzkoa-Arabetako Partzoneria, e. b.), edota ibaiei gagozkiela, berauek lanbide bertsuak eta elkarrekin lotuak sor ditzakete bi ertzetako jendeen artean: adibidez, guztientzat da ibaiko ura industriarako indar, merkatalgorako garraio-bide, etab. Balio kontrajarriok –banatzaile, elkartzaile– Urumeako bi ibai-aldeetako historian ere begi-bistakoak izan dira.

Esan dugunez, urak penintsula egiten zuen Donostia (eta lehenago irla ere); baina, isolamendu horretan, ura zen berriz ere mundura irten eta

25. MACHIMBARRENA, J. (1945): *San Sebastián, presente y futuro*. Madrid. 10-11.

hirira sartzeko bidea. Arrantzale eta marinelek itsasoa zuten maite, baina ontziolek eta ola zaharrek ez zituzten batere deitoratzen Urumea ibaiko inguruak, lanerako eta harremanetarako.

Lur lehorreko bide eskas eta txarrek errazten ez zutena, ibaiak laguntzen zuen, mareagorako saka-indarra ere erabiliz. XVII. mendeko lehen laurdenean azaldu zigun Isastik ibai-inguru hauetako lanak nola ageri ziren (1625)[26]:

> *A esta vienen por mar los bageles de Somorrostro y Portugalete (que llaman* chanuqueros*), cargados de vena de fierro hasta ochocientos quintales, y entran con riesgo por la barra de Surriola y la descargan para llevar a las herrerías de agua que hay en el contorno.*

Urumea babesgune izan da, eta lantegi ona, mendetan. Gipuzkoari buruzko beste azalpen askotan bezala, gozamena da Larramendi-ren XVIII. mendeko deskribapen hau hona ekartzea[27]:

> *El Urumea es río que nace en las montañas de Navarra* […]. *Entra en Guipúzcoa por más arriba de las ferrerías grandes de Picoaga y, bajando por el barrio que se dice de Urumea y por las ferrerías de Ereñozu y Fagollaga, sale a las riberas de Hernani, de las más espaciosas y fértiles de Guipúzcoa, y prosiguiendo por Astigarraga, ofrece a uno y otro lado la vista más deliciosa en casas de campo, jardines, huertas, jaros, arboledas, que siguen hasta el barrio de Loyola, y a poco trecho entra por el puerto y puente de Santa Catalina a Zurriola, al Oriente de San Sebastián. Es río notable más de dos leguas, desde el puerto de Santa Catalina hasta algo más arriba de Ereñozu, y en alas o gabarras chatas y anchas suben la vena para las herrerías del Urumea y bajan el hierro labrado a San Sebastián, y hoy los anclotes y anclas, piezas cada una de 74 a 76 quintales, como son las que se han labrado este año pasado. Baja también de tierra adentro el maderamen necesario para los bajeles al puerto de Hernani, y de aquí por el río hasta más abajo de Astigarraga, y de allí por tierra hasta la Herrería del Pasaje*. […]. *Es río de muy regaladas truchas, salmones en abundancia, salmonetes, que llamamos* izoquisemes*, albures, platuzas y algunos otros*.

R. Izagirre-ri zor diogu ibaiko historiaren eguneratze zaindu bat[28]. Urumea ibaiaren ibilera zaharrak ikusi nahi dituenak garaian garaiko kartografia begiratu besterik ez du, eta mapa horietatik frantsesek 1719an egin-

---

26. ISASTI, L. Martínez de (1625): C*ompendio historial de Guipúzcoa*. San Sebastián: I. R. Baroja. (ed. 1850). 506.

27. LARRAMENDI, M. de (1969): *Corografía, o descripción de la Muy Noble y Muy Leal Provincia de Guipúzcoa*. San Sebastián: SGEP. 26-27.

28. IZAGUIRRE, R. (1933): *En torno a los orígenes de San Sebastián. El Urumea y los puertos donostiarras.* Pasajes de San Pedro: Editorial Vasconia.

dakoa gomendatzen diogu, Urumea bere zehar-meharretan eta duna-artean ezagutzeko[29].

Ibaiertzetan, ezker-eskuinetan, portuak zeuden[30], handi eta txiki, haiek joan-etorri handiagoetarako, eta hauek ibai-auzunetako zerbitzuetarako[31]. Ibai-ondoko toponimian hainbat bider ageri zaigu *Portu* hitza, Izagirrek adierazi eta Tellabidek berrikitan berriro bildu digutenaren arabera: *Portuburu, Portuetxe, Portutxoa, Portutxo-txiki*[32].

Bertako mundutxoarekin batera, Urumeako bizitza ekonomikoa urrunagoko interesekin ere loturik ageri zaigu oso goiz. Hemengo Hiri-ibaien artekoaz gain, “hinterland” zabalago batek izan zuen zerikusi historikorik Urumea ibaiarekin.

R. Izagirre-k azpimarratu zigun ibaiaren eta Donostiaren lekumendu geopolitikoaren balioa. Hiriaren sortzea bera, ibai-goitik zetozen interesen arabera ulertu beharko litzateke, Nafarroak itsasorako bere bidea Hernanitik aurkitu baitzuen, bertako portua abiapuntutzat hartzean. Ez da ahantzi behar, Gaztelako Erregea Gipuzkoaz jabetu aurretik (1200) eman zitzaiola Donostiari bere Erret Gutuna (1180). Erreinuko itsasorako irtenbidean, ba, Hernaniko portuaren itsasertzeko kaia eta merkatal puntu izan behar zuen Donostiak[33]. Sorrerako asmo haiek, beren bikaintasun osoan bederen, hutsalak gertatu ziren, azken buruan, baina Donostiak beti eutsi zion lur-lehorraren eta itsasoz beste aldeko harremanen artean bitartekari izateko dei horri.

Urumea ez zen Nerbio izan, baina Larramendik idatzi eta mende bat geroago ere, ibaiak bere baitara biltzen zuen gutxienik bere inguruetako bizitza[34]:

> *Deliciosos salmones se pescan en esta parte del Urumea* [Sta. Katalinatik gora], *valiéndose para ello de unas nasas o presas construidas con juncos: esta pesca produce muy buena utilidad a los propietarios de las presas… Réstanos decir que el r. es navegable cuando sube la marea desde el puente de Sta. Catalina hasta Astigarraga. Atraviesan esta estensión lanchas pequeñas a remo y gabarras cargadas con cuanto necesita transportarse de un punto a otro para el tráfico y continuas faenas de los habitantes.*

---

29. Zorionez, orain eskura dugu mapa-bilduma eder bat: GOMEZ PIÑEIRO, et al. (1994): *Documentos cartográficos históricos de Gipuzkoa*. San Sebastián: Diputación Foral de Gipuzkoa. Aipatutako mapa, 129. or.

30. GOROSABEL 1862: 443-444.

31. IZAGUIRRE 1933: 22-27.

32. IZAGUIRRE 1933: 22; TELLABIDE 1995: 166-167.

33. IZAGUIRRE 1933: 6, 40, 47.

34. MADOZ 1845-1850: 194.



**Urumea ibaia** Urumea ibaia muga zaila izan da beti Hiriraino iristeko, eta egiatarrek hainbat zubi izan dute iraganean ibaiertz batetik besterako. Gaur egun daudenetatik Mundaizko hau da berrikitan eraiki den zubi berria.

Bizia zen, ba, Urumea arrainetan bezala bestelako ogibidetan ere; baina hezigabea, eta hezikaitza. Mareagora, mareabehera, Urumea ibaia bi ertzetara zabaldu ohi zen, eta gero bildu. Paduraz inguratuta zegoen ibaiarro hertsia[35]. Ez da batere harritzeko Kortazar-ek bere plangintzan, zingira haiei aitortu zien lekua, eta Urumean bertan barne-portuari eman zion tokia (1864), izan ere ordurako ibaiko merkatal joan-etorria apalagoa izan arren, indarrean baitzegoen, artean, ibai-bidezko zenbait zerbitzu[36]. Hurrengo urteetan, ordea, kamino berriek eta trenbideak eman zioten ibai-ibilerari azken kolpe erabakigarriagoa.

Hiria, 1863tik aurrera, zabaltzen hasi eta gero, hamarkadatan izan da Urumearen kanaleztatzea eta ibaiertzak itxuratzea udal-buruhausteetako bat, hirirako lur lehortuak irabazteko ahaleginean[37]. Baina hortaz ezer esan

———

35. Ik., egoera horren lekuko, Izagirre-ren mapa: Izaguirre 1933: 22-23; Murugarren 1978: 146.

36. IZAGUIRRE 1933: 43. Kortazar-ek zera zioen bere txostenean: “Es sabido que la ciudad actual se surte por el río Urumea, de leña, carbón, hortalizas. Cuando se haya canalizado el río y se inutilicen los puertos que hay ahora, habrá necesidad de recurrir a otros y a esta necesidad hemos ocurrido proyectando unos muelles en la parte meridional de la nueva población” (CORTAZAR, A. (1862): *Proyecto de ensanche de la Ciudad de San Sebastián*. 17). Dena den, Sta. Katalina Zubitik bertan izango zen hori, hegoaldean.

37. MACHIMBARRENA 1945: 289-300 (1930aren aurreko proiektua seguraski).

baino lehen, eman diezaiogun begiratu bat beste iragan urruntxoago bati, geroago esan beharko ditugunak argitzeko balioko baitigu horrek.

Ibaiaz bestaldean, Egia zaharraren ondoko auzoa Santa Katalina izan zen iraganean, Egiatik Donostiako hirigune nagusia baino askoz hurbilago zegoena. Gaurko Maria Cristina Hoteletik Amara aldera doan ezkerraldeko eta bereziki Sta. Katalina zubiaren inguruetako historia urruna eta hurbila Luis Murugarren-ek eman digu zuzen eta agiriztaturik[38].

Donostian bertako ezkerreko ibaiertzak historia jakingarria ezagutu du. Antigoaleko Santa Katalina portua (Donostiako bigarren portua, kasu honetan ibai-barnean ezarria) gaurko San Martin eta Hondarribia kaleen bidegurutzean zegoen, gutxi gorabehera, eta berorren ondoko auzunea hiriko harresiz kanpoko errebala zen, harik eta 1719an, arrazoi militarrengatik, auzoko 20/25 etxeak eta bertako eliza lurrera eraitsi ziren arte; orduan desagertu zen aspaldidanik ezaguna zen Sta. Katalina basilika (1301ekoa da berorren lehen albistea), eta Santa Mariara joan behar izan zuen bertan egoitza zeukan Marinelen Kofradiak, 1690.ean 523 kofraditar izatera iritsitakoak[39]. Ordu arte, eta gero beste gisa batean, Sta. Katalinako portu hau izan zen ibaiko joan-etorrien bilgunea, mendez mende, eta Urumeako barra arriskutsuegi bilakatu zenetik, bertatik eraman ohi izan ziren, lehorrez, garraio-gaiak Urgull-peko itsas kai handira[40].

XIX. gizaldian etorkizun berri bati ekitean, Donostiak pentsatu egin behar izan zuen bere ibaiarekin zer egin, fisikoki noski, baina baita ekonomiaren aldetik atera zekizkiokeen emaitzetan ere, merkatal hiri izateaz gain udaleku ere bilakatuz joan baitzen Donostia mende horren bigarren partean. Parisen Sena, edo Londres-en Tamesis bezalatsu, Urumea ere hiri turistiko baten pasealeku izan zitekeen, ertzetan eta uretan bertan[41], baina hori amets hutsa izango zatekeen, baldin eta ibaiertzei beren mugamarra finkatzen ez bazitzaien.

1864an bertan, murruak hautsi bezain pronto, ekin zitzaion ibaiko ezkerraldearen kanaleztatzeari (Bretxa eta Sta. Katalinako zurezko zubiaren artean), eta 1876tik aurrera eman zen hurrengo pausua, Sta. Katalinatik Amararakoari heltzean, eta 1881etik aurrera proiektua bizkortzean[42]. Dena den, behin betirakoa edo izan den hainbat eraikin seinalatu ez zen

---

38. MURUGARREN 1987: 8-9. Harrizko azken zubiaz ik.: RODRÍGUEZ SORONDO 1985: 85-91. Gros eta inguruetarako ere balio lezake: 135-140.

39. MURUGARREN 1987: 7, 12, 13; GOROSABEL 1862: 452, 462.

40. IZAGUIRRE 1933: 42.

41. Ibaiak Donostiako hirigintzan izan duen lekua ezagutzeko, ik. Galarraga 1994: 65-70 (Kortazarren Plangintzan ibaiak duen lekuaz, eta *post factum* gaur egun ibaitik hirira begira dugun ikuspegiaz ari da).

42. *Futuro urbanístico 1980*: 65.

hemen jaso dezente geroago arte: Victoria Eugenia Antzokia eta Maria Cristina Hotela (1912), Zurriolako Zubia (1921)[43].

Egiatik bertanago, ibaiaren eskuinaldeko kanaleztatze-lanak astiro etorri ziren, behar eta eskea ere neurri berekoak ez zirelako, noski. XX. mendean heldu zitzaion bigarren lan honi. Data jakin bat da hemen erabakigarria: 1905a. Urte horretan eman zitzaion Udalari eskuinaldea Sta. Katalinatik gora kanaleztatzeko baimena, bertan lur-eremuak Udalerriarentzat irabazteko eskubidearekin[44].

Ez dezagun ahantz, hau dena gertatzen ari zen bitartean, ibaiko alde bietan baina lur-barnerago, hain "jatorra" gertatzen zaigun paisaia hiritarra burutu gabe ageri zela. Artzain Onaren elizako lehen harria jartzera joandako agintariek, ontzietan joan behar izan omen zuten eraikuntzarako aukeratutako lekura, padura baitzen artean han nagusi (1888)[45].

María Cristinatik gora, ordea, beranduago etorri ziren gauzak. Trenbideetako Konpainiarekin lorturiko hitzarmenean, urte batzuk geroago ere (1912), hiru urteko epea segurtatu nahi izan zuen Herriko Etxeak lanetarako[46]. Beste muturrean, Urumearen bokalean, eskuineko kanaleztapen-murrua ez zen bukatu 1911-1914.ak arte. Oraindik geroago, hamarkada pasatxo bat igarota (1924-1926) lortu zen Maria Cristina zubitik tren-zubirainoko eskuinaldea kanaleztatzea[47].

Frantziskotarrak Atotxara iritsi zirenean ere (1923), donostiar guztiek ez zuten erabat garbi ikusten ibaiarekin zer egin: alde batetik, Loiola alderaino urezko pasealekua zen ibaia, baina ur eskasia zetorrenean, kirats txarrik ere suertatzen zen; bestalde, hori eta bestelako arazoengatik, kanaleztapena premiazkoa ikusten zen, baina, zerbait ausartagorik nahi eta, norbaitek proposatu ere egin zuen: "¡No sé a qué esperamos para abovedar el Urumea!" (1922)[48].

Honaino ibaiaz jardun baldin badugu, zeragatik izan da: Egiako auzoak hirirako bidea nahitaez berorren gainetik egin beharko zuelako; historian beti gertatu zen bezala, baina orain dinamika hiritar baten barnean. Eta molde berean Hiriak ere: Egia Auzoaz baliatu nahi baldin bazuen, ibaia zeharkatzeko hartarako zubiak jaso beharko zituelako. Bien bitartean, ibaia zen hesi.

---

43. *Futuro urbanístico 1980*: 73, 77.

44. ANABITARTE 1971: 173.

45. MURUGARREN 1987: 12. Ik. MURUGARREN, L. (1975): *La Catedral del Buen Pastor. San Sebastián.* San Sebastián: CAM. 22-23.

46. ANABITARTE 1971: 175.

47. GÓMEZ PIÑEIRO 1982: I, 110-111; *Futuro urbanístico 1980*: 72, 73, 77.

48. MURUGARREN 1978: 146-147.

## 2. Egia: Hiriko Auzo baten jasotzea (1864-1998)

Edozein Hiritako Auzo baten hiritartasuna, bertoko gizon-emakumeen lanbide eta bizimoduek bezainbat, Hirian txertatzeko hari eman zaizkion azpiegitura hiritarrek eta Auzoan jasotako eraikinek definitzen dute. XIX.aren bigarren partean, goraka zetorren Hirigune bizkor baten periferian zegoen Egia. Ez urrunegi, baina bai bere kokagune topografikoan aski albora lekuturik. Urumea aipatu dugu, baina, berori gorabehera, Egiak beti izan zituen Donostiako hirigune zentralarekin harremanak, ohiko erosotasun edo eragozpenekin.

Hala ere, aldi berriek erraztasun hobeak eskatzen zituztenean (1863), betiko zurezko zubi zaharrak bakarrik zituen Urumeak, eta hori gaitzerdi izanik, 1864an trenbide batek moztu zion Auzoari ibairainoko bidea ere. Bazirudien, ba, gauzak hobera egin behar zutenean, zaildu baizik ez zirela egin, nahiz eta agerian zegoen, Geltokia hor jarriz gero, Hiriak ere bere bideak bertaraino luzatu beharko zituela. behintzat.

### *2.l. Donostiarako zubiak, Egiarako zubiak*

Urumea gaineko zubiek beti izan dute lekuren bat Donostiako iragana gogoratu izan dutenen idazkietan; egia esan, ez da hori deus orijinala, zeren hiri gehienek baitituzte beren ibai eta zubiak. Urrutira gabe, begira bestela Baiona edo Bilboko historiak ere. Baina, iraganekoen ondoren, XIX-XX. mendeetan garrantzi larriagoko zera izan da zubien hau Donostian, berorien premia larriagoa zelako, noski, baina baita, kostu handiko eraikinak izanik, egin ere berehala egiterik izan ez zelako.

Aurreko mendeetan eta XIX-XX.etan Donostiako Urumea trabeskatu duten zubi nagusienak, ibai-goitik hasi eta itsasoraino, ondoko hauek izan dira: Loiolakoa, trenbideari bide eman zion burdinazkoa (1864), María Cristina, Sta. Katalina, Zurriola. Modernoak direnetan ere, guztiok izan dute beren historiaurrea, eta berorien ondoan egon da, gainera, besterik, denak ere lekuz zerbait aldatuz eta berrituz joan direnak.

Ibai-gaineko zubion ondoan, ordea, ez dira azken mende eta erdian trenbide gaineko iraganbideak baztertu behar, berauen faltak edo desegokitasunak ondorio nabaria izan baitu Egiaren hiri-garapenean: Geltoki parekoa dago alde batetik, eta Iztueta Gain-zubia bestetik. Gehienei buruz zerbait esan nahi dugu orain, Egia egin edo kontraegiten izan duten zerikusi zuzenagatik.

### *2.1.1. Zurezko zubiak harrizko (eta burdinazko ere) bihurtu zirenekoa*

Gaur egun ezagutzen ditugun harlanduzko zubi apain eta sendo horien aurretik, bi ibai-aldeak lotzeko hainbat zurezko zubi izan du Urumeak, Udalari eta Auzoei buruhausterik franko ekarri zieten zubiak. Puntu batetan baino gehiagotan izan ziren horrelakoak.

**• Loiolako Zubia (1862)**

Urumea zeharkatzeko hiruzpalau puntu ziur eta historiko izan dira Sta. Katalinatik hasi eta ur-gora aurki zitezkeenak. Egia da bestelakorik ere izan dela, denboraldi batean indarrean egon eta laster desagertu ohi izan denik, alegia. Hemen beste iraunkorrago haiek gogoratu nahi ditugu, eta Egiarekin zerikusi zuzena izan dutenak betiere.

Tradizio luzea izan duten zubien artean zeuden Sta. Katalinakoa lehenengo, eta Loiola nahiz Ergobiakoa gero; berriagoak ditugu Burdinazko Zubia eta ondoan oinezko eta beribilentzat eraikitakoa. Loiolan Egiarako dagoenak historia zaharra du bere lekuan, eta Administrazioak Sarasolako Zubia ere deitu izan dio[49]. Donostiatik Astigarragarako kamino berria urratzean zubi honek bere gain izan du urte askotako zama. Egiatarrentzat Sta. Katalina Hirirako joanbide zuzena izan den bezala, hegorako eta Urumea bailaran Hernanialdera egiteko (ibaia bera ibili nahi ez bazen, behintzat), zubi hau zen Egiatik irtenbidea ematen zuena. Izan ere, ez dezagun ahantz, Pasaia-Irunerako bidea Astigarragako errepide-bidegurutzean suertatzen zitzaiola Donostiari.

Horregatik, Astigarragako bidea arretaz zaindu izan zen, Caminok dioenari jaramon egin nahi badiogu, behinik behin (1794)[50]:

> *Otros puentes tiene la ciudad* [Sta. Katalinakoaz gain, alegia] *en su jurisdicción con el de madera en Loyola, sobre el mismo Urumea, el más inmediato al famoso de Ergobia, en Astigarraga, construido modernamente en piedra, por donde tira el camino real de coches, y otros que por su poca consideración se omiten.*

Testuak oharren bat edo beste eskatzen du. Camino-k 1794an idatzi zuen hori; hortaz, errepide nagusia Hernani eta Astigarragatik zihoan garaietan. Hain zuzen, Ergobiako puntu hori kamino nagusikoa zelako, XVIII.ean harriz ere egin zen (1713-1726). Loiolakoak ez zuen, artean, halako suerterik izan, are gutxiago Donostiatik Oriamendirako kaminoa ireki ostean (1768tik aurrera). Horrela, aldi batez, Donostiatik Egian

49. TELLABIDE 1995: 139.
50. CAMINO 1962: 243.

zehar Astigarraga eta Hernanira zihoan bide honek bere indarrean zerbait galdu zuen. Hala ere, ez guztiz nonbait.

Lehen karlistadakoan erre egin zuten Loiolako zurezko zubi zaharra, eta 1840an jaso zen berriro, ostera ere zurezkoa. Baina, aldez aurretik ere ikusita zegoena, urte batzuen buruan hondaturik zen berriro zubiaren zurezko egitura hura, baliagarri oinezkoentzat bakarrik izateraino. Donostiako Udalak harriz eraikitzea erabaki zuen, 1860an. Azkenik, harrizko hau 1862an burutu zuen Etxebeste arkitektoak. 189.000 erreal kostatu zen obra berria[51].

Mende-laurden bat geroago, eta eskaintzen zituen eta eskatzen zitzaizkion zerbitzuei erosoago eta segurtasun hobez erantzuteko, harrizko zubi hau zaharberritzeko deliberoa hartu zuen Herriko Etxeak (1885): kaminoa zabaldu egin zen, bi aldeetan 1,60 zm-ko espaloi bana jarri ziren, eta orduan eman zitzaizkion alboetako harresiak. Obrak balio izan zuena ere ezagutzen dugu: 20.642 pezeta[52].

Geroztik, noizbehinka egin diren mantenu-lanekin gure egunak arteko erabilpena izan du, eta zalantzarik gabe, azken hamarkadetan Loiolatik Amararako bideak segurtatu eta zabalera onean eman ez diren arte[53], Egiak zubi honetan aurkitu du hegorako irteera eta bide honetatik etorri zaio Auzoa nahitaez trabeskatu duen joan-etorri moderno ugaria, betiere, zubi batetik bestera zihoana: Loiolakotik Sta. Katalinara. Baina honi heldu aurretik, egoki izango da Burdinazko Zubia ere hona ekartzea.

### • Burdinazko Zubia (1863, 1932)

Trenbidea urratzean gainditu behar izan zen berriz ere Urumea ibaia, Loiolatik etorriko zen trenari Egiara bidea urratzeko. Trenbideari emandako burdinazko lehen pasabideak hirurogeita hamar urte bete zituen (1863-1932), izan ere trenek eta lokomotorek beste tamaina handiagoa hartu zutenean, zahar hura ez baitzen aski izan eta, bestalde, Hiriak ere zubien arteko ibaiertzetako zirkuitua osatuta utzi nahi baitzuen.

Burdinazko Zubia zutoinez aldatu eta osatzeko lanak 1931ko apirilaren 4tik 1932ko ekainaren 31rainokoan burutu ziren[54]. Lehenengotan, oinezkoentzako pasabidea nahi zen egin, eta aurrekontua ere egin zen

---

51. MURUGARREN 1978: 200-201. Ik. ondoko oharra ere.

52. ANABITARTE 1903: 322-323.

53. Urumearen arroan XXI. mendeko bideek beste jite bat izanen dute, Urumeako Autobiaren Saihesbidea abian denetik (GI-131: 1998ko abenduan aurkeztutakoa). Ondoko hilabeteetan erabaki beharko da Proiektu ofizial hori ala beste hautabideren bat egin.

54. Hemengo albisteak Donostiako Udal Agiritegian bilatu behar dira: D 3-IX, 1816-9: “Adquisición del Puente de Hierro de Loyola a la Compañía de F. C. del Norte de España”. 1931tik 1936raino doan espediente zabala da.

horretarako, baina laster oinezko eta berebilentzakoa ere izan zitekeela pentsatu zen. Bigarren irtenbide honen lehen aurrekontua 100.000 pezetako izan zen, baina zubi zaharra zutoin berrietara kurrituz egitea merkeago atera zen, azkenean: 84.950 pta.

1932ko urtarrilaren 23tik 24rako gauean ezarri zen dena bere lekuan: bi zubi zeuden gau hartan lekuz aldatzeko. Tren-zubi zaharra behin-behineko beste zutarrietara eraman behar zen, eta, aldi berean, oinezkoen zubi berria zutarri zaharretan ezarriko zen. Ikustekoa izan zen ekintza, eta 50 minututan egin zen dena[55].

1932ko maiatzean pasa zen zubi hau Udaletxearen jabetasunera; hala ere, zorua hormigoiz berdintzeko ondoko hilabeteetan egindako lanen inguruan ez zen auzirik falta izan administrazio ezberdinen artean. Dena den, gisa hartan, Donostiak gau batean zubi berri bat irabazi zuen Urumearen gainetik, Mundaiztik Amarara iragan ahal izateko. Aurrerago ikusiko dugu nola iraun duen honek, bere behin-behinekotasunean, Hiriko laugarren zubi handia eraiki den arte (2000).

### • Santa Katalina zubia (1872)

Zubi honen historia izen bereko auzo, portu eta elizaren iragan urrun lauso edo ezagunagoan galtzen da. Erdi Aro hartatik hona, Isasti-ren Gipuzkoako Historian espreski aipatzen da hori (1625)[56]:

> *A poco trecho de la villa está la puente que llaman de Santa Catalina sobre el río Urumea, que es de madera grande y costosa, de gentil artificio, y para el reparo de ella da cada navío de trigo que viene al muelle media fanega* [ez da ahantzi behar bertantxe zegoela Sta. Katalinako portua ere].

Camino-k Donostiako historialarien arbaso jakitun ezagunak ere utzi zigun beti funtsezko egitekoa izan zuen Santa Katalinako zubi honetaz oroitzapenik (1794). Donostiako zubien artean nagusiena Sta. Katalinakoa omen zen, luzean 224 pausu zituela, eta zabalean 9. Antigoalean, bere azpitik ontziak pasatzen uzteko ireki egiten omen zen zubia. Zubizain batek laguntzen zituen ontzien joan-etorriak, eta 1377ko ordenantzak arautu zuen haren soldata nola ordaindu: Urumeako alde horretan harrapatutako izokinetako hamarrena utzi behar zen zubizainarentzat.

Zurezko hamarren bat zubi aipatu izan dituzte historialariek Santa Katalinan bata bestearen ondoren, beti ere hiritarrak eta auzo-lagunak harrizkoa noiz eraikiko zen zain zeuden bitartean[57]. Zurezko zubiaren

---

55. Peña-k deskribatu digu berrikitan Burdiñazlo Zubiko eraikuntza: Peña 1999: 80-81.
56. ISASTI 1625: 506.
57. MURUGARREN 1978: 194-200.

mantenimendua ez omen zen batere merkea, eta harriz eraikitzeko irrika bizia zuen Udalak, urteroko gastua handia baitzen zurezkoa bere onean gordetzen (1.000 dukat). 1659an pentsatu zen zubiari harroinak behintzat ematea, baina XVIII.aren hondarretan artean eztabaida izan zen zurezkoa uzteko ala harrizkoa egiteko proposamen kontrajarrien artean. Camino-rentzat argi zeuden harrizko baten abantailak, baina historialaria ez zen iritsi bere egunetan halakorik ikustera, nahiz eta egin ere egin zen horretarako zenbait ahalegin[58].

XIX. mendean Udalaren eginkizunen artean bizirik egon zen Santa Katalinako zubi berriaren asmo hau. Are gehiago errepide nagusia (N-1) hiritik pasaraztea lortu zutenez geroztik (1847)[59]. Hain zuzen, urte beretan jasotako albisteek zerbait hobetuta deskribatu zuten Donostiako zubi hau, aurreko urteetako historia ere eginez. XVIII eta XIX. mendeen mugetan, mende-erdi beteko gerra-aldarteen lekukoa izan zen zubia, esaten zaigunez[60]:

> *Es de madera con sus dos estribos de piedra de sillería; de construcción sencilla al par que sólida, con una extensión de 440 pies, divididos en ocho tramos de a 55, y 24 de ancho; pasa por él la carretera, y a uno y otro lado hay andenes para peatones. Durante la dominación francesa de Napoleón se construyó un magnífico puente de madera, que fue quemado por los defensores de la plaza en el sitio de 1813: desde entonces existió hasta 1819 un puente provisional, en cuyo año la Junta de obras y el Ayunt. procedieron con sus arbitrios a construir otro hermoso puente de madera, al que en 1823 se cortaron dos arcos o tramos, y en 1835 fue quemado por los defensores de la plaza al aproximarse los carlistas, no habiéndose aún concluido de pagar su coste, que fue de 967.032 reales. Por mayo de 1836 el General Espartero erigió un puente para las operaciones del ejército, y el ayunt. y vecindario tuvieron que sufrir este nuevo gravamen.*

Errepide nagusirako azken moldaketa, bidea egiten ari zen enpresaren bizkar joan zen, eta jasotako testu-buruan deskribatu dena zen. Hori horrela, Santa Katalinako zubia Hiriko murruak urratu eta berehala egin nahi izan zen harriz, eta 1872ko ekainaren 23an ireki zen: 127 metro zituen luzean, eta 12, zabalean, eta batik bat harlanduz egina zegoen, Mutriku eta Loiolatik ekarritako harriz; 663.882 pezeta kostatu zen obra[61]. Zorionez, urte horretako edo berehalako argazkiak ere baditugu eskura, horietako bat Konkorrenetik ateratakoa[62].

58. CAMINO 1963: 242-243.

59. Aurreko errepidea, esan dugun bezala, Donostia albora utziz, Andoaingo kaletik Astigarragara zihoan, eta Iruna.

60. MADOZ 1845-1850: s. v. “San Sebastián” (*Gipuzkoa 1991*: 196).

61. ANABITARTE 1903: 320.

62. IZARO 1979: 69-70 (25 eta 27. argazkiak).

Egiatik begiratuz, zubi zahar haiei buruz egindako ondoko ohar honek badu egiatarrentzat interesik:

> *Los puentes antaño enfilaban hacia la "Calzada de la cuesta" o "de Eguía", recorrida por el camino de Pasajes, para evitar los arenales anegadizos de la zona baja, por donde divagaba el arroyo que procedente de los altos de Alza recorría pertenecidos de los caseríos Eriyoene, Chofre (del que recibió el nombre), Errecalde, Iturriberri, Flamencoene y Machuene, hoy calle de Miracruz y casas inmediatas.*

Egiako baserrialderako ate izan zen beti Sta. Katalinako zubia, zuzenean; baina gogoan izan behar da, gainera, Geltokirako bidea ere bazela jada. Dena den, ez da pentsatu behar 1872ko eraikin berria N-1-eko eta hiriondoko hazkunde azkarra irensteko lain izan zenik; alderantziz, hamarkada batzuen ondoren premiek berori zabaldu eta birmoldatzea ekarri zuten, eta 1911, 1924 eta 1978.etan egin zen obra.

Zurriolako zubian egindako lanen ondoren, berriz ere Sta. Katalina egokitu beharra ikusi zen, eta 1924an egindako obraren berri arduradun izan zenaren eskutik dakigu. Orduan hartu zuen zubi honek gero ezagutu dugun itxura berria, lehendik zituen bost arkuetarik bat kenduta, bere farola handiekin eta 12 metrotatik 25etara zabalduta. Gastuak ere halakoak izan ziren: 555.202 pta.[63].

Horrela segurtatu zen behin-betiko Egiarako sarrera on bat (beti ere, tartean zegoen trenbidearen baimenarekin…). Baina, bien bitartean, XIX-XX. mende-mugarako Amara-aldea hedatzen ari zen, eta Hiria Ipar Geltokiaren aurrez aurre zegoen, batzuetan oso Egiara begira, gainera; ikusiko dugun bezala, XIX.eko azken bi hamarkadetan aisia eta atsedenerako zerbitzuak Egiara bildu baitziren. Aspaldidanik zurezko zubia zegoen tokian harrizko bigarrena ere premiazkoa zen, are eta premiazkoago Hirirako bisitariak (eta nolako bisitariak!: Madril eta Gorteko jenderik finenak…) Geltoki hartatik sartzen zirenez. Horregatik egin zen María Cristina zubia.

### • María Cristina zubia (1905)

Anabitartek jasotako planoan ageri denez (1900eko data du berorrek), ibaia Geltokiaren paretik zeharkatzeko behin-behineko zubi bat zegoen bertan. Aspalditxotik zetorren nolabaiteko pasabide hori: jada, 1893an, aurretik zegoen aldi bateko beste bati segida emanez Goikoa-k proiektatutakoa zen berori[64].

---

63. MACHIMBARRENA 1945: 209-212; Anabitarte 1903 320-321.

64. ARSUAGA, M.; SESE, M. (1996): *Donostia-San Sebastián. Guía de arquitectura.* San Sebastián: Colegio Oficial de Arquitectos. 158.

Baina inondik ere ez zen premiari erantzuteko adina eta Hiriaren duintasuna erakusteko gauza[65]. Halaz ere, beharrak behar, eraikuntzak bere atzerapenak izan zituen XIX. mendean, gehienbat Udalak ohiko edo ezohiko bere Aurrekontuetatik halako tamainako obra nola ordain zezakeen ikusten ez zuelako. Dirua falta, ba[66].

1903an hartu ahal izan zitzaion gaina ezin horri, Donostiako Aurrezki Kutxa Munizipalak 700.000 pezetako kreditua eskaintzean (interesik gabe, eta 100 urtetan itzultzeko). Herriko Etxeak gogo argiz ikusi zuen eskaintza, eta lanei berehala ekin zitzaien. Horretarako lehiaketa baten ondoren (14 proiektu aurkeztu ziren), J.E. Ribera eta J.M. Zapata-k irabazi zuten lehen Saria.

Lehiaketara aurkeztutako proiektuetan denetarikoak zeuden: bazen bat 80 metrotako argiunea zuen arku bakarrekoa; aldiz, onartua izan zenak hiru arku zituen, bakoitza 30 metrotakoa; zabalean 20 metro eman zitzaizkion. Sarreretako lau obeliskoak (15 m) ez zeuden jatorrizko proiektu sarituan, baina Mahaiburukoek iradokirik jarri ziren, Pariseko Alexander III.aren zubikoen antzera.

1904ko maiatzean onartu zen obretarako azken aurrekontua (702.217 pezetatakoa), eta Ama Erreginak Donostiari hemengo bere udaldien bidez ekarri zion sona aintzakotzat harturik, María Cristina izena jartzea erabaki zuen Udalak, urte bereko abenduan. Lanak bizkor joan ziren eta 1905ean prest zegoen dena, irekiera ofizialerako[67]. Bederatzi hilabetetan burutu zen lana, eta 1905eko San Sebastian egunez izan zen estreinaldia[68].

Jai handiekin ospatu zen gertakizuna: koruen kantaldiak, elizkizunak, hitzaldiak, dantzaldiak, danborrada, suak… Bi zubi handien arteko pasealekuetan jai ederrak egin ziren, ospakuntza haietan ez baitzen zubiarena ere bakarrik ospatu, Geltokiaren inguruko berrapainketarena ere bai.

Jose Zapirain bertsolariak utzi zigun ospakizunen oroitzapena, ondoko bertsoetan *Zubi berriya*-ri kantatuz[69]:

*Goizetikan dago gaur jendia ernaya*
*Ikusitzeko gogoz zubi bat berriya,*
*Toki onian dago yayo ipiñiya;*
*Laister igaroko da jende ugariya,*
*Guztiz apaindutzen du orrek Donostiya.*

---

65. Anabitarte 1903: 254/255, 321-322.

66. RODRÍGUEZ SORONDO 1985: 148-152; Murugarren 1978: 201.

67. ANABITARTE 1971: 55-58.

68. Zubiarekiko datu teknikoagoak: Machimbarrena 1945: 206-209.

69. MURUGARREN 1978: 202; Joxe Zapirain eta zapiraindarren berri jakiteko, ik. Auspoa bilduman: (1975): *Zapirain anaiak: Juan Kruz (1867-1934), Joxe (1873-1975)*. Tolosa.

Hortaz, Urumeari zegokionean eta Egiarako, ibaiaren ezker-eskuinaldeen artekoa konpondurik geratu zen María Cristina zubiarekin.

(Ez gara hasiko, orain, Zurriola edo Kursaalekoaren historia hona biltzen, gure Auzotik at geratzen baita berori, baina, esan dezagun bederen, 1921eko abuztuaren 14an ireki zela jendearentzat Zurriolako zubi hau, zenbait arazo tekniko gainditu ondoren[70]).

Hala, María Cristina Zubiaren bidez Amara Zaharrerako/Zaharretik, ba, ibai-gaineko pasabide erosoa segurtaturik geratu zen; Amara Berriko geroko hazkundeak, ordea, joan-etorri berria sortu du, premia berriak. Horren guztiorren irtenbidetzat ibai-gaineko laugarren zubi handian ikusi da, hain zuzen 2000.ean eraiki dena.

Urumea gorabehera eta Egiarako mesede edo kaltetan, Auzoko komunikabideen arazoa ez zen, ordea, ibaiarena bakarrik.

### *2.1.2. Trenbideari gaina hartzen*

Esan dugu: trenbidea izan da Auzoaren eta Hiriaren tarteko bigarren hesia. Geltokia sortu orduko, ibaia zeharkatu beharraren premia nabaria izan zuen Hiriak: arrazoi praktiko eta irudizkoengatik, hein handi batean modernotasuna Geltokitik baitzetorren, eta handizkiak ere bai.

Trenbideak, ordea, ez zion Hiriari bere egunerokoan enbarazurik egiten, Egiari baizik, eta trenbidearen hesi hau trabeskatzeko ez ziren sentitu larritasun eta behar bera han eta hemen: Hiritik "urrun" suertatu zen, beraz, Egia. Hala ere, Auzoak gora egin ahala gero eta nabariagoa gertatu zen trenbide gaineko pasabideren bat moldatu beharra, oinezkoentzat bezala beribilentzat.

Bi puntu hautatu izan dira horretarako, Atotxako bi muturretan: alde batetik, oinezkoentzat Geltoki-ondoan jasotako gain-zubixkak (eta gero trenbide-azpiko pasabidea), eta, bestetik, Astigarragarako kaminoan trenbide azpitik moldatutako pasabideak eta Iztueta Gain-zubia[71].

---

70. Oinarriak emateko lanbide berezia hartu zen: "Consistía éste en sumergir unos cajones de hormigón armado, previamente construidos y llevados por flotación hasta el emplazamiento de las pilas. Esos cajones, aguzados y en forma de campana por debajo, se incarían excavando con aire comprimido y vertiendo simultáneamente por encima el hormigón necesario para llenarlos y hacerles alcanzar la profundidad fijada" (Machimbarrena 1945: 204).

71. Gogoan dugu Mundaitz barreneko ibai-gaineko zubi-pasabidea (Burdinazko Zubia deitua, 1858, eta 1932an berritua). Ik. Sada/Sada 1997: 146.

### • Geltoki-ondoko Gain-zubixka (1898) eta lurpeko pasabidea (1971)

Bizilagunen Auzo hiriztatua izan aurretik, donostiarrentzat (ikusiko dugu hori) Egia-Atotxa atseden-leku izan zen, jada XVIII.ean pasealeku bezala, eta Hiriko berrikuntza modernoa garatzean, hainbat kirol- eta aisia-lekuk bere kokagunea hemen izan zuelako (pilotalekuak, belodromoa, zezen-plaza, etab.). Jai eta ospakizun-egunetan bat-bateko jende-andana erakarri ohi zuen Egiak ibaiaren eskuinalde honetara, baina bertara iristeko, nonahitik zetozela ere, trenbidea zeharkatu beharra zuten hiritarrek. Eta ez arriskurik gabe.

1898an, Iparreko Geltokiaren paretsuan, trenbide-gainetik metalezko gain-zubixka bat egitea erabaki zuen Udalak, Amara Zaharretik zetozen jendeentzat Atotxarako pasabide izan zedin. Lehen zubixka horren lekua ez zen izan gaurkoarena, Geltokiko ostatuaren eta kotxeren artekoa baizik). 34.800 pta. kosta zen lehen obra hura[72].

1905ean, Maria Cristina Zubia eraiki eta inguruak ere zaharberritu eta itxuratzean, pasabidea ere lekuz aldatzea erabaki zen, berorretarako sarrera Zubiaren paretik bertatik emateko moduan utziz. Moldaketa berriak urte batzuetarako balio izan zuen.

Hala ere, Gain-zubixka ongi zaintzeak bere gastuak zituen, eta inoiz pentsatu ere egin zen lurpeko iraganbideren batez ordezkatzea (1919); baina arazo juridikoek moztu zuten asmoa. Hala ere, 1920-1921.etan bi lehiaketa egin ziren Gain-zubixka osorik egokitzeko[73], zeren mundu ofizialak aitorturik baitzuen zubi zaharkituaren egoera txarra, eta arriskua, eta jakina zen gaizki zegoen pasabide hartatik 3.000 oinezko zebilela egunero.

Azkenik, 1923an, Udalak bere kontura egitea erabaki zuen, 1922an udal zerbitzu teknikoak aurkeztutako proiektu bati jarraikiz. Matxinbarrena ingeniariak egin zuen proiektu berria: metalezko egitura zaharra porlanez hartuko zen, eta eskailerak berritu eta sarrera-aurpegia guztiz berritxuratu[74]. Funtsean hori izan da 1960.ak arteko Gain-zubixka ezaguna.

Hamarkada horren azken urteetan heldu zitzaion, berriz ere, Geltoki pareko pasabide honen arazoari bere ordua, trenbideaz bestaldeko 32. Poligonoaren Planarekin batera. Trenbide-azpiko pasabidearekin konpondu nahi izan zen, orduan, Gain-zubixkak zuen eskasia edo ahulezia.

1967ko azaroan iritsi ziren akordio batera Inmobiliaria Azuhol eta Udaletxea, Poligonoko etxegintzan erraztasunak ematearen truke pasabi-

72. ANABITARTE 1903: 321-322; Anabitarte 1971: 62.
73. ANABITARTE 1971: 62-63.
74. MACHIMBARRENA 1945: 213-215.

dea ere irekitzeko[75]. Lehen Proiektua 1968an onartu zen, Manuel M. Santos Saralegi-rena hain zuzen, eta berorren arabera hamar hilabeteko epean burutu beharko ziren obrak.

Ondoko hilabeteetan udal teknikariek erreparo batzuk jarri zizkioten lehen proiektu horri, pasabidearen lekutzea aldatzea proposatuz, loretegiak gordetzeko asmoz, eta orduko *ranpa* eskailerarekin ordezkatuz. Azuhol-ek Proiektu berria aurkeztu behar izan zuen 1969ko otsailean: bederatzi hilabeteko epea izango zuten lanak burutzeko, eta Aurrekontu osoa 6.795.894,02 pezetakoa zen[76].

Renfe-ren baimena 1971ko urtarrilean lortu ondoren, Construcciones Laurak S. A.-k, obra-egileak, ondoko hilabeteetan burutu ahal izan zuen lana, Egiarako pasabide berria moldatuz, jada gaur egun berriro eztabaidagai ere dena, Iztuetaren Gain-zubia izan den bezalatsu.

**• Iztueta Gain-zubia (1944)**

Atotxa Pasealekuko beste muturrean, Egiako bideek berriz ere trenbidearekin egiten dute estropezu. Loiolako nahiz Santa Katalinako zubiak pasatuta, batetik nahiz bestetik doanak Iztuetara iristean, trenbidea pasatu behar izan du 1864tik hona, eta berdin Egiako Galtzadatik zetorrenak. Hemen ere soluzio ezberdinak erabili izan dira hesi horri gaina hartzeko.

Geltoki ondoan oinezkoei eman zitzaien bezala, beribil eta kamioei ere trenbidea gurutzatzeko zubiren bat edo eskaini beharra aspalditxotik zetorren. 1922an izan zituen lehen joan-etorriak asmo horrek, eta esan ere egin zen, Geltoki ondoan eta Gain-zubiskaren parean ez ote zen horretarako lekurik egokiena.

Bien bitartean, Iztuetako pasabidea (txarra eta arriskutsua) trenbide azpitik zegoen egina, eta Matxinbarrenak 1936an Gain-zubi zabala egitea proposatu zion Udaletxeari, bertako teknikari bezala, baina gerrateak moztu zuen hori, harik eta 1939an garraiolariek irtenbide proposatua aurrera bultzatzeko eskatu zuten arte.

---

75. Udaletxeko Agiritegian ikus daiteke proiektu eta obra honen espediente lodia: A 3916-1. 1967tik 1975era doazen paperak dira, eta barnean ditu Inmobiliaria Azuhol-ek egindako segidako bi proiektuak (bata, 1968koa, eta bestea, 1969koa). Agiri hauetaz baliatzen naiz hemengo berriak emateko.

76. Honela dio Aurrekontuak: "Excavaciones: 1.224.565,06; hormigones: 2.540.119,80; pavimentos y revestimientos: 500.359,20; complementos: 325.784; reposiciones de pavimentos: 525.500; alumbrado: 93.145; partida alzada a justificar: 700.000. Total de ejecución material: 5.909.473,06; 15% de contrata: 886.420,96. *Total de ejecución por contrata*: 6.795.894,02 pts.".

1941ean Udalak eta Aldundiak proiektu atzeratua onartu ondoren (eta bertako auzo-lagunen gogoaren kontra), 1944an burutu zen lana, lehendik zegoen azpi-pasabidea errespetatu (eta zabalduz ere) eta trenbideari gaina hartuz. Iztuetako Gain-zubi honek 15 metroko zabala zuen (ibilgailuentzat 10, oinezkoentzat 2,50 m-ko bi espaloi), eta inguruak itxuratzeko parada eman zuen lanak. Sta. Katalina zubia berritzen erabilitako teknikez (1925) baliatu zen Matxinbarrena obra honetan ere[77].

Trenbideak (beste zenbait hiritan bezain desitxuroso ez joan arren) zenbat buruhauste sortu dituen azpimarratzeko balio du 1942an Bidagorek bere Gipuzkoako Plangintza Orokorrean proposatutako honek[78]:

> *Como obra más remota, cabe suprimir el paso del ferrocarrik por Atocha* [trenbidea bera kentzea, alegia], *pasando en túnel desde Eguía a Ategorrieta y alejando unos 200 metros la estación actual.*

Horrelako iraulketarik ez zen egin, eta apurka-apurka birmoldatuz eraman den egoera du Egiak, Hiriarekin dituen komunikabideetan. Auzoeraketa ez da, inondik ere, erosoa izan, alde horretatik.

### *2.2. Egiako kamino-bide eta kaleak*

Oriamenditik Hernaniko bidea egokitu zen arte (1776)[79], eta garbiago esateko, 1847an N-1a Lasartetik bideratuta Donostiara sartu zen arte (nahiz eta mende bete lehenago Errepide Nagusia Donostiaraino ekartzeko eskatuta zegoen: 1756)[80], Hiriak ez zuen izan Probintzia barnearekin edo Errepide Nagusiarekin harreman errazik[81].

Garai batean Udalak eta herritarrak auzo-lanean elkartuta urratu eta zaindu ohi zituzten bideak, harik eta 1889an kamineruak edo kaminozainak sortu ziren arte. Erabaki hau garrantzizkoa izan zen Hiria eta beronen inguruetako auzo eta herriak hobeki lotzeko, baserritarrak berak ere handik gertuago suertatu baitziren bide-kaminoen sarea berritzean. Baserrialdeak berak ere hiritartzeko bidean egokitu ziren, ba, XIX. mendeko hondarretan[82]. Baina ez dezagun historia aurrera.

---

77. MACHIMBARRENA 1945: 215-219.

78. *Futuro urbanístico 1980*: 136.

79. GOROSABEL 1972: I, 149.

80. GOROSABEL 1972: 154-155.

81. BERRIKITAN, C. Larrinagak eskaini digu Donostiako kamino-bideen historia txukun bat: LARRINAGA RODRIGUEZ, C. (1999): *Actividad económica y cambio estructural en San Sebastián durante la Restauración, 1875-1914*. Donostia-San Sebastián: Kutxa. 67-80. Xehetasun agiriztatu gehiago nahi duenak hor aurkituko du.

82. Ik. Larrinaga Rodríguez 1999: 73-75.

Berrikuntza horien aurretik, Hiritik Errepide Nagusiaren bila (N-1-era alegia) Egia-Loiolan barrena joan zitekeen Astigarragaraino, nolabaiteko bide batetik, Oriamenditik itzulian nahi ez bazen behintzat[83].

Konformidadean, zaharra zen Astigarragako kamino hori, batez ere XVIII.ean hobeagoak sortuz joan ziren heinean. Kamino zaharron nolabaiteko egoera eta eskastasuna honela laburtu zituen Gorosabel-ek, Gipuzkoako Errepide Nagusiez ari zela[84]:

> *Los tres caminos principales* […] *eran calzadas de piedra dura de unos diez a doce pies de ancho, construidas con poco arte y esmero.* […]. *Entonces no se conocían coches, galeras, ni carromatos, y se consideraba como un gran progreso tener camino abierto para el tránsito de personas y caballerías cargadas a lomo.*

Errepide Nagusiez hori esan baldin bazitekeen, tamalgarriagoa zen, noski, auzo-bideena. Astigarragako horri hobeagotzeko tenorea iritsi zitzaionean (XIX. mende-erdialdean edo), Errepidea zuzenean Donostiara sartzeak ez zion Egiari deus asko lagundu (kamino-berritzen esan nahi da, zeren zubitan bai, harlanduzko Sta. Katalina eskueran jarri baitzitzaion, ikusi denez).

1846 inguruan egin zen lehenengo zaharberritze bat Donostiatik Astigarragarako bidean, Egian bertatik hasita, Pinuetako Aldapan (Egia Gainetik Loiolako Zubira doan horretan, alegia), batez ere tarte horretan oso gaizki omen zegoen-eta galtzada[85]:

> *Los caminos ant. principales son: el que conduce a Astigarraga por el delicioso valle de Loyola; antes de llegar a este valle hay que cruzar la divisoria llamada Piñueta, cuyo trozo se hallaba en mal estado por ser muy antigua la calzada que existía. Hoy* [1846] *se está ejecutando su reforma en términos que dentro de dos meses se podrá llegar a las risueñas riberas de Loyola por un camino muy regular en el que podrán transitar los carruages hasta dicho valle.* […].

Konponketa hauek onak izanik ere, mende-laurden baten ondoren berriz heldu behar izan zitzaion lanari, bide bera hobetzeko baino bideari *kamino* molde berria emateko. 1871an Aldundiak egindako lan hau gogoratu dutenek, erabateko berrikuntza egin zela adierazi izan dute, bere "estreinaldia" izan zuela azpimarratuz[86].

---

83. Donostiaren zailtasunak eta egoera historikoa ongi jaso du zerak: ACHON INSAUSTI, J. A. (1998): *Historia de las vías de comunicación en Gipuzkoa. 2. Edad Moderna (1500-1833)*. San Sebastián: Diputación Foral. 40-41 (mapa), 73-74, 108-110, 136, 139. Ik. *Futuro urbanístico 1980*: 59.

84. GOROSABEL 1972: I, 135-136.

85. MADOZ 1845-1850: 197.

86. Urbanistes Associats 1978a: 228; VARII: *Futuro urbanístico 1980*: 65.

Egiako historia modernoan Iztuetatik Egia Gainera eta Loiolako Zubira doan kamino-kalea izan da Auzoko bizitzaren ardatza, baina azken hamarkadetako kalegintza berrien aurretik ere, Egiak bazuen beste zenbait karrika. Horietako historiko bat, Egiako Galtzara: hondartza inguruko zingiretan galdu gabe, mendialdetik zetozenak Sta. Katalinako zurezko zubi zaharrera hurbiltzeko bide aproposa.

Mende honen hasieran Egiak zituen kamino-bideak, hau da, artean kale izatera iristeko behar diren etxadirik apenas zutenak, 13 ziren (horietako bat, aipatutako Astigarragakoa zelarik): orotara, zortzi kilometrotako kamino-bide sarea zen. Batzuk kamino-kamino bezala ageri dira, etxe artetik kanpora zihoazenak (Mundaitz, Altza)[87].

Kale-kaminoen artean, Udalarentzat ardura berezikoa izan zen kanposanturakoa, agertu ere orduko kaletegian bi modutara agertzen da berori, zein adiera ezberdinetan garbiki ez dakigula[88]. Aspaldidanik zebilen Hiria hilerri egoki baten bila, eta 1875ean erabaki zuen Udalak hura Polloen jartzea, aldi berean harako bidea urratuz, Astigarragako kaminotik hasita, Erreka baserriaren ondotik gora. Antxuene, Leriñene, Erreka, Konfitegilene eta Konkorrene baserrietako lurretan zehar egin zen hilerrirako bidea; 675 metro izan zituen, eta Barrio arkitektoa izan zen obren arduraduna[89].

Hastapen haietatik aurrerako kale-sortze eta moldakuntza, kasik XX. mende osoan, Auzoko etxegintzarekin paretsuan joan da, honelakoetan izan ohi diren desparekotasun batzuekin izan arren. Etxegintza horren historiari helduko diogu, ba, ondoren.

### *2.3. Egiako eraikuntza modernoa (1864…)*

"Egiakoa" diogu, baina berdintsu esan genezakeen "Egiarena", zeren hurrengo lerroetan etxegintzaz eta, era berean, Auzoko gizarte-bilakaeraz jarduteko asmoa baitugu; baina oraingoz bego horretantxe.

#### *2.3.1. Zenbait ohar orokor*

Egiako hirigintzak, etxegintza eta Auzoa bere alde guztietatik begiratuta ere, bi epealdi hagitz ezberdin izan ditu:

---

87. ANABITARTE 1903: 312-313. Ik. gainera Larrinaga Rodríguez 1999: 76.
88. ANABITARTE 1903: 312: "Camino al Cementerio de Polloe" eta "Camino desde Atocha al Cementerio de Polloe".
89. ANABITARTE 1903: 310-311.

1) Lehenengo, baserriarte zaharra desegin gabe, komunikabide, lantegi- eta aisiarako eraikinak ia bakarrik zituen garaia (1864an trenbidea ezarri zenetik aurrera: geltokia, hilerria, zezen-plaza, tabako-fabrika, belodromoa, pilotalekuak, etab.). 1925ean, artean 60ren bat etxe edo eraikin barreiatu ageri zaizkigu Egian[90].

2) Bigarren, Auzoa batez ere etxebizitzaz hiriztatu den garaia, baserrimundua hutsaren hurrengo bilakatzen zen bitartean: jende etorkinez bete da Egia (Euskal Herrikoz nahiz Erbestekoz), lehengo industri lantegietan aldakuntzarik izan da, Hiri nahiz Probintziarako osasuneta hezkuntza zerbitzuak sortu dira, eta batez ere Auzorako merkatal zerbitzu arruntak eratu (1940...).

Pentsa daitekeenez, bi epealdiak elkarren arteko eten osorik gabekoak dira, baina batik bat azpimarratzekoa da, bigarren aldian etxegintzak izan duen lekua, eta horren ondorioz, ikusiko dugun bezala, biztanleriaren soslai-aldakuntza eta espazioaren erabateko moldaera berria (1940ko Egiako planoa eta gaurkoa guztiz urrun daude elkarrengandik).

Hasteko esan dezagun garbiki: Egia ez da Donostiako Hedagune bat izan, bere adiera hertsian behintzat. Hau da: Egia ez da izan aldez aurretik aurreikusi eta arautu, eta horren arabera, egikaritutako Auzoa. Baina horrelako Hedagune izan gabe garatu diren Hiriko beste Auzoen artean ere, Plangintzek eragin eskasa izan dute Auzo honetan. Egia, kanpotik izan dituen eraginez eta barneko hazi-minez, bere gisara jaso den Auzoa da, ia azken ordura arte. Hala ere esan beharra dago, Auzoaren nortasuna, bere hirigunetasunean, borobilduz joan dela hamarkadak zehar, gaur egun Aldundiaren planoan (1998) ederki ikus daitekeenez.

Sarritan nabarmendu izan da Egiako desplangintza horren abia hori, une eta kolore ezberdinetako tintaz esanda: Matxinbarrena (1945), Gómez Piñeiro (1982), teknikari ezberdinek edo 1976an egin nahi izan zen Plangintza berrazterketa, Cañamero; denak ere zentzu berean mintzatu dira[91]. Horregatik, Egia ez da Auzo “datagarria”, neurri batean Gros eta zehazkiago Intxaurrondo edo Berio izan daitezkeen moduan.

Biztanleriaren hazkundeak sustaturik, Egiako eremu eraikia gora joan da: 1900an, 14 Ha ziren eraikita ageri zirenak; 38 Ha ziren, 1950ean, eta 90 Ha, 1975ean[92]. Ikusten denez, mende honetako lehenengo berrogeita hamar urteetan 24 Ha berri eraiki baldin baziren, hurrengo hogeita bostetan 52 Ha jaso ziren etxegintza horretan.

---

90. ANABITARTE 1971: 233.

91. MACHIMBARRENA 1945: 153; GÓMEZ PIÑEIRO 1982: 112; Urbanistes Associats 1978a: 224; CAÑAMERO 1994: 75.

92. VARII: *Futuro urbanístico 1980*: 64, 72, 90.

Auzoko hirigintzaren abiada Donostiako beste Auzoetakoekin alderatu nahi duenak, grafiko lagungarri bat du Urbanistes Associats-en lanean (232. orrialdean).

Hiri-periferiako zenbait eremurekin batera (Herrera, Pasaia, Altza), C Sailean dago Egia ere; hortaz, Donostia Hiri Metropoliar bezala eraikitzera doan unean (1945aren inguruetan) hasi zuen bere hazkunde bizkorra, hazkunde azkartu horretan D eremukoei (Aiete-aldea, Antigua eta Amara Berri) hogei urtetako aldea hartuz[93].

1962-1980.etan Plangintza Partzialen itzalpean garatutako Egiako hirigintzaren abiada honela deskribatu du Cañamerok[94]:

> *En lo que respecta a la zona de Eguía, la expansión urbana ha tenido una dirección muy clara, remontar la colina en dirección al cementerio. La actuación constructiva se ha plasmado en el inmueble colectivo, parecido al de la zona periférica, aunque debido a su cercanía al centro de la ciudad, sus habitantes tengan una calificación superior a la de aquellos. La intensidad de ocupación, por otro lado, no llega a los extremos de las zonas situadas en el Este (zona de Alza o La Paz), aunque el contraste entre las alturas de los edificios y el viario dan una sensación clara de congestión.*

1980tik honako hamabost-hogei urteetan, Egia barneko berrantolaketa izan da kezketako bat, espazio komunei leku egiteko eta zenbait bizigune libre irekitzeko. Horrekin batera, azken urteetan, Polloe ingurua da hiriztatu dena, etxe bakarrak nahiz erantsien auzoak sortuz (Tolaregoia etxadia, adibidez).

### *2.3.2. Egiarako Plangintza-asmoa (1942)*

Esan dugu: praktikan, Egiako hirigintzari urrun geratu izan zaizkio ia beti Plangintza Orokorrak, eta gehienez ere Plangintza Partzialen batek ukitu du Auzoa. Hala ere, landu zuten behin hirigintzaz arduratuek Auzo honetarako propio egindako Plangintza jakin bat, berehalako gerrate-ondo hartan (1942)[95]. Gerora izan dugun Egia ezagutzeko ez bada ere, Plangintza hark balio digu, nik uste, izan zitekeen Egia bat amesteko, eta errealitate elkorragoa kritikoki begiratzeko.

Proiektu honen oroitzapena ez da guztiz galdu Donostiako hirigintzaz arduratu direnen artean[96], baina, hala ere, egitasmoaren autoreak berak utzi

---

93. Urbanistes Associats 1978a: 232.

94. CAÑAMERO 1994: 75-76.

95. Plan honen berri jakiteko Matxinbarrenaren lana ezagutarazi digun Jose Mari Aranburu arkitekto jaunari gure eskerrona agertu nahi diogu, eta honetan eta hirigintzari buruzkoetan esku zabalki eman digun laguntzagatik, eta orobat zenbait harremanetarako zor diogunagatik.

96. VARII: *Futuro urbanístico 1980*: 79; Gómez Piñeiro 1982: I, 112.

zigun azalpenera joan beharra dago zerbait zehatzik jakiteko (artxiboetaraino heldu nahi ez bada behintzat). Egiako Plangintza proposatuaren aita Juan Matxinbarrena izan zen, Udaletxeko Zerbitzu-Burua ia mendelaurden batean (1921-1944)[97].

*Ensanche de Eguía* izenburuarekin aurkeztutako Plangintzagai honek ondoko asmo hau zuen, autoreak dioenez[98]:

> *El año 1942 presenté al Ayuntamiento un proyecto de ensanche del barrio de Eguía. No pretendía con ello que ese plan fuera exactamente el que con carácter definitivo había de ser aprobado. Mi intención era promover el interés y estudio del asunto en la Comisión especial de Ensanches y hacer recaer sobre el desdichado barrio de Eguía un proyecto de ordenación cualquiera: el mío o el que el Ayuntamiento escogiese.*

Proposamenaren atal arrazoituan zazpi puntutan azaltzen zen egitekoaren bidea: 1) Ordenamendu baten premia. 2) Hedagune gisara egitearen komenentzia. 3) Hedagune proposatuaren bideragarritasun ekonomikoa. 4) Gainerako Hedagune onartuekiko zuen bateragarritasuna. 5) Proiektuidazketaren arrazoizkotasuna. 6) Proiektuaren azterketa ekonomikoa. 7) Zenbait datu osagarri.

Ez dezagun ahantz Plangintza-proposamen honen urtea (1942), zeren urte horietantxe hasi baitzen Egiako hirigintzaren berezko bizkortzea, esan dugu. Goraldi demografiko-ekonomiko handiaren bezpera-bezperan zeuden, eta teknikariek ongi ikusi zuten Egiako hiriztapenean lehenbaitlehen esku hartu beharra[99]:

> *Actualmente, en toda la zona que comprende el proyecto de ensanche de Eguía no existe la menor ordenación. Así, no hay plan alguno para el trazado de vías públicas (calles y caminos vecinales), ni de alineaciones, ni de rasantes. Tampoco existe nada relativo al trazado de un sistema de saneamiento, de abastecimiento de aguas ni alumbrado. Las construcciones que en esa zona pueden erigirse no están sujetas tampoco a reglamentación ni en cuanto a altura ni en lo referente a superficie edificable.*

Proposamenean adierazitako erabakirik hoberena auzuneari Hedagune-izaera ezagutzea zen, betiere Auzo honi zegokion xumetasunaren ildotik ("nada de grandes avenidas ni plazas monumentales", zioen Planak). Plangintzako gastuak 6.500.000 pezetatara hel zitezkeen, esaten zenez[100].

---

97. MACHIMBARRENA 1945: 153-159.
98. MACHIMBARRENA 1945: 153.
99. MACHIMBARRENA 1945: 153.
100. MACHIMBARRENA 1945: 156.

Xehetasun gehiegitan sartu gabe, ongi etorriko da Plangintzaren mamiaz zerbait esatea. Hiru partetan banaturik zegoen asmoa: a) Lehen parteak, Iztuetatik Mundaitzera eta Urumeatik trenbiderainokoa hartuko zuen; b) Bigarrenak, trenbidetik Atotxa eta Egia Gainera, Alcolea eta Polloerako igoera. c) Hirugarrena zen zabalena (Hiri-Jardina): Aldapa baserritik Tturkorako malda, Moskotegitik Tunisa eta Loiolako Kasernetara, eta azkenik Kaposantu atzetik, Tunis eta Lizardi inguruetatik Egiako Galtzadaraino.

Zer egingo zen, ba, hiru tarte horietan? Geltoki-inguruetan ez gauza handirik: eraikita zegoena errespetatuz, plazatxo bat Geltoki ondoan, trenbideko zenbait lur berdegune bihurtu, ibai-ondoan Mundaitz alderaino etxebizitza-lerro bat (gogora hemen, bide batez, 1942an iradokitzen zela hori dena, hain zuzen ia hirurogei urte geroago, orain, egikaritu dena, beste gisa batean noski).

Berrikuntzarik larrienak bigarren eremuan zetozen, trenbidetik Egia Gainerako tarte horretan alegia. Honetaz Proiektuak zera zioen[101]:

> *En Atocha, entre el ferrocarril y el paseo, donde hoy se halla enclavado el campo de fútbol, se proyecta una expansión o plaza de 43 metros de anchura. Partiendo de la Portería de Cristina-Enea, se proyecta una calle que asciende por terrenos de Alcolea hasta enlazarse con la carretera de Eguía, antes del alto. Esta calle serviría como variante de la subida de Eguía, descongestionando el tráfivo y haciendo de límite con la Ciudad- Jardín.*

Tabako-fabrikatik Mundaitzerako bideari tunel eta zubia eman beharko zitzaizkion, Amarako zabalgunera iristearren, eta ibaiaren eskuinaldean, Loiolako Kasernetaraino, oinezkoentzat pasealekua moldatzea iradoki zuen proiektuak; baina etorkizuna oso bestelakoa egin zezakeena, batez ere Hiri-Jardina zen, esan dugun bezala Pinuetako Aldapatik Hilerri gora eta Intxaurrondoko mugetaraino hedatuko zena[102].

Eta zer gertatu zitzaion Matxinbarrenaren Egiarako Plangintza honi? Ez zuen, nonbait, harrera onik izan (*…tan gélida recepción tuvo*, dio egileak), eta asmo onen linbo handira bidali zuen Udaletxeak egitasmoa. Eta Egiak, zekarren bidea eraman zuen gerora ere, baina garapen basago bati segiz orain.

Hain zuzen, errealitate gordin horretara itzuli behar dugu ondoko atzera-begiratuan.

---

101. MACHIMBARRENA 1945: 158.
102. Plangintzaren Planoa: Machimbarrena 1945: 157.

### *2.3.3. Berezko eraikiera librean*

Egian diren, edo izan diren, eraikinen kronologiaren bidetik, oroigarri nagusi batzuk ekarri nahi ditugu hona.

Daten hariari begiratuz joango garenez, gogora dezagun 1864koa dela abiapuntu ona kronologia honi hasera emateko: izan ere, urte horretan lekutu zen Egiako paduretan Ipar Trenbidea eta Geltokia, Hirigune Zentrala eta hazi-mina auzoalde honetara erakarriz, eta, zortzi urteren buruan, bi ibaialdeetako Hiri-Auzoen arteko elkartasuna indarturik suertatu zen Santa Katalinako Zubia harriz jasotzean. Hamarkada labur baten buruan, horrela geratu zen segurtaturik Egiaren bokazio hiritarra.

**• Trenbidea eta Ipar-Geltokia (1863)**

Bidagor-ek adierazi zuena aparte (1942), trenbideari Hiriko garapen orokorrean ez zaizkio erreparo handiegiak jarri (nahiz eta Egiako hiritartasunari ez zion onik egin). Honetaz Matxinbarrena kritikoak zera zioen[103]:

> *La línea férrea se pliega al monte al salir de la estación en sus dos direcciones, y salvo el cruce de las riberas de Amara y en el boquete de Atocha, el ferrocarril no puede tener un trazado más respetuoso con las posibles zonas de expansión urbana.*



**Auso-alde berria.** Trenbidearen inguruko berrikuntzek etxadi berriak sortu dituzte haren eta Urumearen artean, ibaiaren eskuinaldeko etxagintzaren aurpegia ere osatuz.

103. MACHIMBARRENA 1945: 230.

Dena den, ez ditzagun ahantz Groseko Geralekutik Ategorrietarantz trenbideak dituen arazo oztopagarriak. Bestalde, Hiriarekikoak horrela izan arren, bestelakorik da Egiari berari dagozkionetan: eremu hiritargarri zabala hartu zuen hor trenbideak (egia da: artean, paduretan galduta zegoena gehienbat), eta badakigu jada, berorren ondorioz, trenbide-alde bietako harremanak zein zurrundurik gertatu ziren.

1858ko ekainaren 22ko data esanahitsua da[104]: Itxaropen berriei bere estreinaldia emanez, Hiriko agintariak Urumea gora etorri ziren, gabarraz, Geltokia jarri behar zen puntura. “Compañía de los Caminos de Hierro del Norte de España” zeritzan sozietatea zen Trenbidea Madriletik Donostiaraino luzatu behar zuena. Ofizialki, 1864an iritsi zen lehenengo trena[105]. Isabel II.aren senarra estreinaldiko bidaia horretan etorri zen, Madrildik Pariserako bidean, eta baita Gustavo Adolfo Bécquer zeritzan poeta-kazetari bat ere[106].

Lehenengo Ipar Geltokia 1863an egin zen Letoumeur frantsesaren ardurapean, eta 1880an Biarez-i eman zitzaion Geltokian hainbat eraikin berri eta erreforma egiteko mandatua. Agian, beronen enkarguz, Eiffel izan zen metalezko estalki handiaren egilea. Eiffel-en partaidetza hau zalantzatan jarri izan bada ere, gaur egun segurutzat eman behar da ingeniari sonatuaren autoretasuna[107].

Bestalde, Geltokiaren eta ibaiaren tarteko eremuan, nahikoa atzeratu ziren proiektu eta asmoak. Alde batetik Geltokirako bidea, artean, nahitaez Sta. Katalinara joan behar zuena, urtetan egon zen Compañía eta Udalaren arteko konponbide baten zain: azkenik, 1891ean “Camino de la Estación” deitu zitzaion egindako bideari. Dagoeneko ikusi dugu, 1905ean Maria Cristina Zubia harriz ezartzean, Geltoki-inguruak ere berriztatu egin zirena, eta auzotarrentzako Gain-zubixka ere bai.

---

104. Lehen eskuko albisteak nahi dituenak, labur eta argi LARRINAGA RODRÍGUEZ 1999-an aurkituko ditu, 86-106. Kazetal mailan: Peña 1999: 235-242.

105. Gorosabel-ek emandako kronologia honek osatzen dizkigu zertzeladak: “se consiguió poner la vía en estado de explotación el día 1º de Septiembre de 1863 en la sección comprendida entre la ciudad de San Sebastián y villa de Beasain; el 22 de Octubre del mismo año, desde San Sebastián hasta el Bidasoa; el 20 de Agosto de 1864 la sección de Beasain a Alsasua. La inauguración general de todo este dicho trayecto del territorio guipuzcoano y navarro, se verificó en aquella ciudad el día 15 del mismo mes” (ik. GOROSABEL, P. (1972): *Noticias de las cosas memorables de Guipúzcoa*. Bilbao: La Gran Enciclopedia Vasca. I, 161).

106. Sada/Sada 1997: 79.

107. Zalantza hau bizirik egon da orain gutxi arte (ik. Arsuaga/Sesé 1996: 159), baina Eiffel-ek berak banatutako aurkezpen-katalogo batean ageri da Donostiako lan hau ere. Katalogo hori Madrilgo “Fundación de los Ferrocarriles Españoles” erankundeko liburutegian ikus daiteke. Eskerrak Joan Jose Olaizola jaunari, puntu honetarako eman dizkigun argibide eta ziurtasun hauengatik (Azpeitia: Eusko Trenbideak, Museoa).

1905eko egokiera hura zela-eta, Geltoki-inguruko zerbitzuek eta espazio-uneek aurpegi berria hartu zuten. Bide honen eta ibaiaren arteko tartean, Udalak eta Compañía-k lur-trukaketa baterako akordioa lortu zuten 1910-1912etan, Geltokirako kaminoa Udalaren eskuetara ekartzeko[108]. Berrikuntzak eginik, 1913an "Avenida de Francia" bilakatu zen garai bateko Hiritik "Geltokirako Bidea"[109].

**• Kiroldegiak eta olgeta-lekuak (1877…)**

Egiako Auzoak bere modernotasunera iristean, eta berorren ezaugarri bezala, Geltokia eta batez ere bere kiroldegiak izan ditu. Pilotalekuak, belodromoa eta bestelako olgeta-tokiak, Atotxako Pasealekuan bereziki. Horretaz gogora dezagun zenbait datu.

Pilotalekutan, bat baino gehiago izan da Auzoan. Lehenengoa 1877an estreinatu zen, Eibar-eko Txikito eta Billabonako Maingua pilotariekin[110]; pilotaleku hau 1913an izan zen eraberritua, eskuz ez ezik erremintaz ere jokatzeko izan zedin[111]. Berau izan zen Donostiako lehen pilotalekua, aro berrian; zezen plazaren inguruan zegoen, belodromoaren atzean (gerora futbol-zelaia izan denarenean, alegia)[112].

Bigarren pilotalekua 1905ean estreinatutako "Frontón Jai-Alai Moderno" izan zen (geroko Garaje Moderno-ren orube berean); honek ez zuen zorte onik izan: 1933a arte bere horretan iraun ondoren, urte horretan sute batek desegin zuen, eta orduan desagertu zen[113].

Atotxako Udal Pilotalekua, hirugarrena, 1914an moldatu zen[114], 1877ko pilotalekuko aurreko eta alboko paretez baliaturik. Artilleriako kaserna eta gero Ospitale Militarra han ezartzean desagertu samartu zen hau[115].

---

108. Anabitarte 1971: 173-176.

109. Anabitarte 1903: 308-310.

110. Garaiko pilotari sonatuenak, beraz. Eibar-eko Txikito durangarraz (Indalezio Sarasketa, 1860-1900) zera idatzi da: "Con toda seguridad, el jugador más completo y extraordinario que la pelota ha producido". Eta Billabonako Mainguaz (Pedro Iartza) autore berak: "Uno de los más famosos jugadores del siglo pasado". Ik. BOMBIN FERNANDEZ, L.; BOZAS-URRUTIA, R. (1972): *El gran libro de la pelota*. Madrid. II, 1466, eta I, 730-748; II, 1479.

111. ANABITARTE 1903: 277-278.

112. Bombín/Bozas 1972: II, 67.

113. Beste informazio-iturriak utzita (Berruezo, Sada/Sada), Bombín/Bozas-i jarraikitzen gatzaizkio Atotxako pilotalekuen kronologian. Ik. Sada/Sada 1997: 113-114; Berruezo 1989: 110 ere.

114. Dena den gogorarazi behar da, 1878ko pilotaleku batetik zetorrela hori, eta 1913-1914.etan Udalaren eskuetara etorri zela.

115. Bombín/Bozas 1972: II, 67, 70.

Zezen-Plaza ere izan zuen Atotxak, garai batean. Lehenengoa, zurezkoa, eta goiztarra izan zen, azken karlistada bukatu orduko jasoa, 1876an. Arrakasta ona izan zuen, nonbait, eta hamar urte geroago, gaur egun Atotxako Dorrea dagoen orubean eraiki zen hormazkoa, Goikoa-ren proiektuaren arabera (1886), baina ez zituen hogei urte bete, zeren Txofrekoa eraiki zenean desagertu baitzen (1903)[116].

Pilotaren ondoan, fisikoki ere ondoan, bigarren kirola txirrindularitza gertatu zen. Atotxak Belodromo sonatua izan zuen, gure Hiri, mugalde eta Probintziako zalegoari erantzun bat eman nahirik. Frantziatik iritsi zen txirrindularitza gurera (1887koa edo da horren data), eta 1888an ospatu zen "Atotxako Belodromoa"-ren estreinaldia, María Cristina Erregina ere tartean zela. Bazuen, hortaz, bedeinkazio sozial onik. Herritarren zaletasun pertsonalak ere gora egin zuen, eta 1891n Comet famatuak "velocipedoak" konpontzeko lantegia jarri zuen berorren ondoan edo.

Hala eta guztiz, txirrindularitza honek izan zuen bere beheraldia ere, eta beste kirol bati leku egin behar izan zion handik urte batzuetara[117]: *football*-ari. Ondarretako kirol-lekua utzita Real Sociedad deitua Atotxara etorri aurretik ere jokatu ziren partidak Egian, bertako belodromoan. Laster belodromo hura futbol-zelai bihurtu zuten (1913). 80 urte bete zituen Udalaren bertako Futbol-Zelaiak, 1993an itxi zen arte. Horri esker, esan beharrik ez dago, Atotxaren izena jokaleku onenen izenekin batera ibili dela munduan zehar, XX. mendean[118].

**• Polloeko kanposantua (1875)**

Horiek izan dira Egia-Atotxan kiroldegi ezagutuenak; baina, bizitzak baditu bere kontrasteak eta, Donostiako Hiriak Auzo honetan jarri nahi izan zuen bere hilerria ere, haiekin bizien atsedena eta honekin hildakoena ere zaintzeko.

Donostiak aspalditik zuen kanposantuaren hau konpondu beharrik. XIX. mendeko erdialdean San Martin Auzoan zegoen hilerria[119], baina, txikia eta desegokia izaki, handik ateratzea erabaki zen, eta horrela, 1855ean ireki zen San Bartolomen beste bat[120]. Hala ere, Hiria gora zihoan biztanlez, eta aurreikuspen zabalago batez pentsatutako kanposantua behar zen.

116. BERRUEZO 1989: 73-74; Sada/Sada 1997: 113.

117. BERRUEZO 1989: 101.

118. BERRUEZO 1989: 107. Ik. Peña 1999: 392-395.

119. MADOZ 1845-1850: 196. Deskribapen interesgarria bertan. Eta ondoko albiste hau ere: S. Miñano hiztegigilea bertan zegoen lurremanda, eta Madoz-ek esaten dizkigunetatik dakigu, gainera, Lorentzo Altzate Idazkariaren adiskidea zela berau. Miñano Baionan hil zen, Donostian Liburutegi eder bat sortzeko asmoa zuenean.

120. VARII: *Futuro urbanístico 1980*: 62.



**Polloe Kanposantua.** Egia Auzoak hainbat zerbitzu estimagarri eskaini izan dizkio Hiriari. Hauen artean dago Polloeko hilerriarena (1875), mende eta laurdenean donostiarren ehorzketei irtenbide egokia eman diena.

1865ean izendatu zen arazoari aurre egiteko Udal Batzorde bat, eta zenbait duda-mudaren ondoren, Toledogoi baserriko lurretan eta Polloe inguruan egitea erabaki zen, 1875ean. Garaiko beste hainbat obratan bezala, Goikoa arkitektoa izan zen proiektuaren egilea. 198.000 pezetatako aurrekontua zuen, eta baserrietako lurrak eta hartuz egin ahal izan zen.

Mende-hasieran, Polloeko hilerrian Udalak bere arduradun eta langileak zituen: kaperau bat, atezaina, sepulturagilea eta beronen laguna, bide- eta landare-zaina. Jakin-min denarentzat, esan dezagun guztien soldatak eta bestelako zenbait gasturekin, Polloeko urteko gastuak 6.238 pta. zirela. Hildakoaren ehorzketagatik primerakoa izanez gero 20 pta. ordaindu behar zen, eta tertzerakoan, ostera, 2,50 pta., zeren heriotzak ere molde anitzetakoak izan bailitezke[121].

Geroago batean, kaperauaren etxea eta bestelako apain-obrarik ere egin zen mendeko lehen hamarkadetan (1903, 1904, 1914, etab.)[122]. Handik hona kanposantuko hersturek zabaltze eta egokitzapen berriak ekarri dituzte bertan.

121. ANABITARTE 1903: 446-448.
122. ANABITARTE 1971: 105-107.

Luzaro, Polloeko kanposantua izan da donostiar guztiak, salbuespenik gabe, Egiara ekarri izan dituena, norberaren halabeharrez edota familiarteko hildakoak gogoratzeko[123].

**• Lantegiak: Tabako-fabrika (1913)**

Egia-Atotxan lantegiak oso bertakoak izan dira, eta hiriztatzen hasi aurretik ere izan zen hemen horrelakorik (gogora historialari zaharren berriemateak, edo Torres baserriko ehun-lantegiaz 1802an idatzitakoa). Eta tradizio hark gaur egunak arte iraun du, nahiz eta Auzoa guztiz bestela biztanleturik dugun orain.

Denen artean, Tabako-Fabrika izan da Atotxa-Egiako lantegi handia. Lantegi honen sortzeak XIX. mendeko politika handiarekin zerikusi hurbila du: Mugaldeko aduanak Ebrotik Bidasoara ekarri zirenean, Hiru Probintzietan tabakoen salmenta librea estanko bihurtu zen, eta langilerik franko lanik gabe izateko arriskuan aurkitu. Arazoari irtenbidea bilatu nahirik, Tabako-Fabrika bat jartzeko erabakia sustatu zuen Udalak Madrileko Gobernuaren aurrean, eta baita lortu ere horretarako eskubidea (1878): horrela, 700en bat langile izatera iritsi ziren, Garibai kaleko lehenengo lantegi hartan[124].

Lantegiari egoera erosoagoa eman nahirik, eta etorkizuna segurtatzeko asmoarekin, Haziendak, Compañía Arrendataria de Tabacos delakoak eta Donostiako Udalak 1888an sinatutako hitzarmenaren ondorioz eman zitzaion hasiera fabrika berriko eraikuntzari. Udalak esku zuzena izan zuen lantegi berria egiten: 13.000 m$^2$ eman zituen “en la parte denominada de San Francisco, lindando al Norte con terrenos de la Plaza de Toros”, eta obretarako aurrekontutik 625.000 pta. ere Donostiako Udalaren bizkar joango zen[125].

Lanak hasi eta urte luzetan atzeratuz joan zen eraikuntza, eta Udal Artxibozainak dioskunari sinetsi nahi baldin badiogu, ez beti gizalegez, gainera. Interesak, utzikeriak, etab. tartean izan ziren, Sozietatearen aldetik. Udalak, atzeramenduez eta argitasun faltaz nekatuta, Gerrako Ministeritzarekin mintzatzera ere jo zuen, Compañía-ren lantegi berri eta garestiegia birbideratu eta Kasernatarako har zezan; proiektua ere prestatu zen horretarako (*c.* 1903), artean lanak bukatu gabe zeudela, noski. Indiano batek, Martin Urrutia Ezkurrak, mailegu bat egin nahi izan zion Udalari, obra beste lantegitarako buka zezan (ez baitzen ongi ikusten nora zihoazen Compañía-ren asmoak), baina proposamenak ez zuen aurrera egin (1905).

---

123. ANABITARTE 1903: 276-277
124. ANABITARTE 1903: 285.
125. ANABITARTE 1971: 110.

Tabako-Fabrika honetako eraikuntza-lanak 1911n amaitu ziren, hala ere Garibaiko lantegia ez zen berehala etorri Atotxara. 1912an eman zuen aldakuntzarako ordena Compañía Arrendataria-k, eta 1913ko uztailaren 18an ospatu zen fabrika berri honen irekiera. Data horretaraino Donostiako Udalak eraikuntzan ordaindutakoak, 1.084.750 pezetetara iritsi ziren (garai hartarako egundoko dirutza). Geroztik, Egiako Auzoko paisaiaren parte izan da, eta, zer esanik ere ez, baita, neurri batean, bertako lanmunduko parte osagarri nagusia ere[126].

**• Atotxa-Egiako zenbait eraikin ezberdin**

Donostiako Udal Artxiboan bada inbentario erabilgarri eta eroso bat[127], kalez kale eta zenbakiz zenbaki, eraikin bakoitza dela eta, Udaletxearekin izandako harremanen lehen zertzelada kronologikoak lekutzeko. Egia da, agirietara bertara joan gabe ezin dela eraikinen kronologia guztiz zehaztu, baina era berean, lehen hurbilketa kronologiko bizkor baterako balio digu.

Tabako-Fabrikarekin batera, beste lantegirik ere ageri zaigu inbentario horretan, Atotxako Pasealekuan eta Egia kalean ere. Atotxako bi kale-aldeetako albisteak oso desorekaturik ageri dira inbentario horretan: zenbaki bakoitietan, etxebizitzak eta izaki (eraikin partikularrak berauek), albiste ugariak aurki ditzakegu; baina bikoitietarako (hainbat eraikin ez-partikularrak izan direnean: Ospitale Militarra, Udal Lantegiak, etab.) oso eskas ageri da Inbentario hori, baina bil dezagun hona zenbait zehaztasun[128].

Zenbaki bakoitietan jarri ziren ikastetxe, lantegi nahiz biltegiek ez zuten bikoitietako eraikin eta enpresen tamainarik izan. Besteak beste, Atotxako Pasealekuko zenbaki bakoitietan egon ziren Villa Oteizan (1. zenbakian) eraikitako Aurkezpeneko Ikastetxea (*Col. de la Presentación*: 1912-1923.etan jasoa); esan dugu, Garaje Modernori izena aurreko “Frontón Jai-Alai Moderno”-k eman ziola (1905); Iturralde eta Elizondo bi biltegi ezberdinak egin ziren (hurrenez hurren, 15-17. z.: 1926-1927. urteetan, eta 25-29. z.: 1925)[129]: Pasealekuaren beste aldean jarri zen “Talleres Múgica”, lehenagoko zezen-plazaren orubean egon zena, eta, gutxi gora-behera, gaurko Atotxako Dorrearen lekuan (artxiboko lehen aztarna 1890ekoa da, eta 1960.etaraino iraun zuen hor lantegiak). Pasealekuko etxebizitzei buruzkoak aurrerago aipatuko ditugu.

---

126. ANABITARTE 1971: 11-115.

127. *Inventario de construcciones particulares (1813-1927)*. Eskuizkribua. AMSS/DUA. Sección D.-10. Etxebizitzena aurrerago ikusteko uzten dugu.

128. Hori horrela izan arren, ez gara pasako hemen ikerkizun berrietara, gure idazlan honetako egitekoari bere neurri mugatuetan eusteko.

129. Datak udal expedienteenak dira, eta ez derrigorrez eraikuntza-urteenak. Hurbilpen bezala balio dute hemen, ba, data hauek.

Egia kaleak ere izan zituen bere lantegiak. 3. zenbakian egon ziren Mendiola eta Cía-ren ukuilu eta kotxetegia (1912-1917), gerora karrozeria eta garaje bilakatua (1920). 5-11. zenbakietan jarri zen adreilu eta teila-fabrika (1902tik aurrera); 8.ean, gainera, marmoldegi bat egon zen (1907). Larzabal eta Quintanak zerrategia izan zuten, 8-10. zenbakietan (1911-1912). Eta Egiako kale honetan ez zen falta izan sagardotegi bat: F. Eizmendik 13. zenbakian jarri zuena (1929)[130].

Esku artean darabilgun *Inbentario* horretatik kanpo bilatu behar da, Atotxa Pasealekuaren buruan dagoen/egongo den Epaitegietako Jauregia: garai batean Eskoletarako egina, gerratekoan Artilleriako Kaserna bihurtua, gero Ospitale militarra izana, eta Poliziaren Kaserna, eta azken berreraikuntzaren ondotik Epaitegien egoitza bilakatuko zaiguna.

Bukatzeko, etxe sozialki garrantzizkoa izandako beste bat gogoratuz, esan dezagun estreinatu berria (1999) den Konkorreneko Zahar-Etxe handian (garai bateko Behartsuen Ahizpatxoen egoitzan, alegia) 1889tik aurrera behin eta berriz egin ziren egokitzapen eta zabaltzeak, 1879an etorri baitziren bertara mende betean tradizio handia izango zuten mojak (1879-1992).

Horiek izan ziren Egiako kale eta Atotxako Pasealekuaren hastapen modernoak, baina gero eraikin eta orubeetan erreforma eta berreraikuntza franko etorri zen, eta askotan etxe berriek zaharra osorik ezabatu zuten. Hortik hegora, aldi berean eta aurretik, Mundaizko Bidean lantegi eta biltegiak agertu ziren, eta 1854tik aurrera bada horren agiririk Udal Artxiboan. Baina hor Auzoari bere nortasuna eman dion beste zerbait dugu, batik bat: Parkea.

### • Kristinenea Parkea (Gladysenea)

1917tik aurrera (eta berezikiago, 1926az geroztik) Donostiako Udalak eta Egiak Kristinenean izan du Hiriko Parkerik ederrenetako bat, egiatarrek biziki maite izan dutena, eta inoiz bere izanagatik ez ezik izenagatik haserretzera ere eraman dituen Parkea[131].

---

130. Gipuzkoako Foru Aldundiko Lurralde Informazio Zerbitzuari zor dizkiogun bi mapetan ikusi ahal izan ditugu joan den mende-hondarretako (*c.* 1890) Hiriko plano bat, eta seguraski 1925aren inguruetan egindako beste bat (hau geroztiko zuzenketak, 1944ra artekoak edo, jaso dituena). Lehenengoan Zezen-Plaza hantxe dago; bigarrenean Talleres Múgica-k du leku bera. Oro har, bietan ere, Egia hainbat eta hainbat kalerik gabe ageri zaigu.

131. Errazegi pentsa daitekeenaren kontra, Parkearen izena ez dator María Cristina Erreginarenetik, Mandasko Dukearen (emailearen) emaztearenetik baizik, María Cristina Brunetti y Goyoso de los Cobos baitzen honen izena (†1914).



**Quirón Erietxea.** Garai bateko “Martín Santos” da hau. San Antonio Klinika-rekin batera (orain Osalan-en egoitza) Auzoan hirirako izan diren zerbitzuguneetako bat gertatu da.



**Kristinenea Parkea.** Fermin Lasala Collado-k (Mandas Dukeak: 1832-1917) utzi zion bere testamentuan Parke hau Donostiako Udalerriari, berorri emaztearen izena ezarriz. Pertsonaia politiko ezaguna izan zen Dukea (Ministro Madrilen, eta Enbaxadore Londres-en). Honela ikusten da Atotxako Dorretik Parke hau.

Atotxa Pasealekuko amaieratik hegora doan lurraldea bi barruti nagusitan banatzen da: Mundaizko Bidetik Urumeara doana (lantegiak eta Renferen lurrak bereziki), eta Bide beretik ezkerrera Urumearen mugetaraino doana (hau ere bitan banatua: Kristinenea bera, eta Olazabaldarrek hegoalderago erosi eta zituzten lurrak). Ikus dezagun orain Parkeari berari dagokiona[132].

Fermin Lasala y Collado politikari liberal donostiarraren (1832-1917) hilburukoaren ondorioz (1917) egin zen Parkearen jabe Donostiako Udala. Fermin Lasala ez zen nornahi izan Donostian, Gipuzkoan eta Espainian ere[133]. Fermín Lasala Urbieta Alkate, Foru-Diputatu eta Madrilen ere Diputatu izandakoaren (1798-1853) semea zen gure Mandas-ko Dukea.

Fermin Lasala Collado-k Isabel II.aren politika liberalean jardun zuen, *progresista* bezala lehenengo (1854) eta *moderatu* gisara gero O'Donnell-en inguruan, harik eta 1868ko Iraultza Loriatsua lehertu zen arte. Tartean, saiatu zen Gipuzkoako Batzarretan eta Diputazioan ere bere politika liberala bultzatzen, Euskal Herriaz ere arduraturik (Azpeitia, 1862-1863). Iraultza-garaietan laster utzi zuen Errepublika, eta Cánovas-en alfontsotarren taldera bildu zen.

Fermin Lasala aztertu beharreko pertsonaia da Donostian eta Euskal Herriko historian. Euskaltzale ere izan zen: sariketak eratu zituen, Aita Uriarte frantziskotarraren lanak kaleratzen ere lagundu zuen eta Londres-en enbaxadore zelarik, beroni esker Euskal Herriratu ahal izan ziren Bonapartek bildutako langai eskuizkribatuak. Foruzale ere agertu zen (Deba, 1857), eta Gerra amaitzean (1876) euskal ordezkari guztiak Cánovas-en politikara inguraturik defendatu nahi izan zituen Foruak[134]. Kritikarik gogorrenak Sustapen-Ministeritzan parte hartzean jasan zituen (1879). 1877az geroztik bizialdiko Senadore egin zuten.

Hiltzean, Gipuzkoako Aldundia izendatu zuen oinordeko oso, eta Donostiari utzi zizkion Kristinenea hau eta bere liburutegia (18.000 ale).

---

132. Kristineneari buruzko albisteak Ander Malumbres Ibisate kazetari gazteak eskuratu dizkit. Eskerrak berari laguntzen jarri duen interes honegatik.

133. Ik. *Euskal-Erria* aldizkariak emandako haren hilondoko albiste luzea: BENGOECHEA, J. (1918): "D. Fermín de Lasala, Duque de Mandas", in: *Euskal-Erria*. LXXXVIII, 1918, 23-32. Orobat: A. A. A., in *EGIPV*, s. v. "Lasala y Collado, Fermín"; begira orain: URQUIJO GOITIA, M. (2002): "Fermín Lasala Collado: Del fuerismo liberal al conservadurismo canovista (1832-1917)", in: *Notitia Vasconiae*. 1. zenb., 1/2002, 343-359.

134. Foruen arazoa testamentuan ere ageri da, bere jarrera zein izan zen erakusteko, eta horretan gorde nahi izan zituen garbitasuna eta praktikotasuna azpimarratuz: "…que si Vasconia, después de oportunas reservas y protestas, hubiera dejado, como en otras épocas, que se planteasen las modificaciones [Foruenak, alegia] que en un principio se limitaba el Gobierno, hubiera evitado que […] el poder victorioso agravase sus resoluciones".

Orobat, San Ignazioko dorrea, eta Artzain Oneko organoa Lasala-ri zor zaizkio[135]. Kristinenearen udal jabetasuna guztiz legeztatzeko 1936an egindako erregistroan ageri dira, luze eta zabal, orube eta ondasun hauen nondik norakoen zertzeladak[136].

Udaletxeak bere eskuetan jaso zuena honetara muga daiteke: orubeak 37.824 m$^2$ zituen; horietako 933 m$^2$ eraikinenak ziren (jauregia, atezain-etxea, sukalde eta kaperak, goarda-etxea, eta beste), eta gainerakoak lurrak. Guztiaren balioa, 289.123,15 pezetakoa zen (lurra, metro karratuko 5 pta., eta eraikitakoena 100.000 pta.)[137].

Lur-barruti horretan zeuden baserri-lurrak erosiz Lasalak osatutakoa zen Kristinene hau; zazpi baserri eta orubeon izenak badakizkigu: *Miquelene* edo *Micaelene, Berriarza* edo *Chicoene* nahiz *Manuene*, *Manuelenea*, *Egañategui*, *Toledo-chiqui*, Renfe-ri erositako lursaila, Leriñeneko lurretako iturburua[138].

Fermin Lasala Collado-k Donostian egin zuen bere testamentua, 1916ko azaroaren 3an, eta, seme alabarik ez zuenez, berorren arabera, ondasunen gozamena bere koinata Ines Brunetti andereari lehenengo eta Jose Brunetti koinatuari eta honen emazteari gero utzi zien, eta azkenik Berenguela Collado ilobari ere (Riscal-eko markesari). Baina, heriotzez edo bestelakoz, hauen gozamena burutzean, Kristineneko ondasun guztien jabetasuna osorik Dosnostiako Udalaren eskuetara pasako zen:

> *…será propietario con pleno y absoluto dominio su pueblo natal, la ciudad de San Sebastián, representada por su Ayuntamiento, pero deberá observar, guardar y cumplir todas las condiciones siguientes, cuya inobservancia o violación caducarán este legado y los demás que hace al Ayuntamiento.*

Hori horrela, ba, badu interesik Lasalak ezarri zituen dohaintza-baldintzak zeintzuk izan ziren jakiteak; banan-banan eta zehazki eman zituen guz-

135. Donostiaren hedapen-unean ere eskurik izan zuen Fermin Lasalak: murruak eraisteko eskearen alde ahalegindu ondoren, beroni suertatu baitzitzaion horretarako Madrileko baimenaren albistea E. Amilibia Alkateari telegrama bidez ezagutzera ematea.

136. *Registro de la Propiedad*: t. 431, lib. 209, fol. 94-99 (finca 6.877). XIX. mendetik hasita egindako erosketen eta jabetasunen historia eginez datorren 1936ko agiri honen berri, eta fotokopia bera ere, Ander Malumbres jaunari zor dizkiogu: eskerrik asko eman digun erraztasun honegatik. Ondoren datozen albisteak agiri honetatik bildu ditugu, bestelakorik adierazten ez dugun bitartean.

137. Aipatu dugun 1936ko agiri ofizialetik (Jabetasun-Erregistroko agiriaz ari naiz, noski) hartutako datuak dira: agiri honek Dukearengandik zetozenen ordura arteko balantzea eskaintzen du, Lasala 1863aren ostean erosiz joan zen guztia bateratuz. Ikusiko dugunez, herentzia jaso eta gero, Udalak gehikuntza batzuk ere egin zituen; horregatik, datuok aurrerago esango denarekin osatu beharko dira.

138. Aipatutako Erregistro-agirian daude izenak, eta lehengo jabeak: fol. 94b, 95a.

tiak, eta auzotarrentzat jakingarri izango direlakoan jasotzen ditugu esandako agiritik hitzez hitz (testamentuaren laburpena da berau, ez hilburukoa bera)[139]:

Primera. *No se alterará lo más mínimo la denominación de "Cristina enea", que actualmente tiene la finca.*

Segunda. *Ha de servir su jardín a parque exclusivamente para paseo público. Así prohíbe terminantemente que se juegue en el parque ni en las casas a juego alguno, sea la pelota, el foot-ball, las quillas, la barra, sea la inmunda rulota, o los caballitos, sea el clásico tresillo. Prohibe absolutamente todos los juegos en "Cristinaenea" [sic]. Prohibe se baile, sólo permite que tres veces al año, en primavera una vez, la segunda vez en verano, la tercera en otoño, toquen la banda municipal y la militar, o cante el Orfeón, pero el concierto o audición habían de terminar antes del anochecer. Siempre ha de quedar cerrado "Cristinaenea" al anochecer. No se tolerarán almuerzos, comidas ni meriendas. Tampoco podrá haber puestos fijos ni vendedores ambulantes de cosa alguna ni siquiera de agua fresca. [...].*

Tercera. *El Ayuntamiento no podrá vender, arrendar, permutar, hipotecar ni una pulgada de terreno, ni una teja de los edificios. Si llegase a estar ruinoso alguno de éstos hoy existentes, no podrá dársele al reconstruido más extensión ni altura que las que hoy tienen y no podrá nunca haber más números de edificios que actualmente. Ni siquiera podrá haber barraca provisional alguna. Tampoco podrá el Ayuntamiento variar ni rectificar el actual trazado del parque, como no sea el camino de carruajes según tiene pensado el testador y saben Don Alberto Machimbarrena y el jardinero Don Eduardo Ibarzabal. No podrá arrancar árboles ni arbustos, sin el parecer conforme de los Ingenieros de Montes -ingenieros del Estado- de las Provincias de Guipúzcoa y Vizcaya. Destinado por el testador "Cristinaenea" a que sea sola y exclusivamente paseo público de San Sebastián, prohíbe terminantemente que las casas secundarias o dependencias sean habitadas por personas que no sean jardinero, trabajadores o criados en la misma finca, así como no menos terminante prohibe que la casa principal por él habitada, lo sea por vecino o forastero con o sin cargo público en San Sebastián ni fuera de San Sebastián, no habiendo de vivir o albergarse en dicha casa principal más que los criados destinados a guardar y cuidarla con todo esmero. Admite dos excepciones que son: Primera.- Si el Ayuntamiento no pudiera disponer de casa adecuada para alojar a un Jefe de Estado o Príncipe que vengan a visitar a nuestra Familia Real, podrá hospedarlos en "Cristinaenea" durante unas semanas. Segunda.- En "Cristinaenea" se alojará el Obispo de la diócesis, cada vez que venga a San Sebastián, lo cual es de desear que sea frecuente para bien de Guipúzcoa y sobre todo de su clero. No creo necesario añadir, dice, pues esto es obvio, que mientras esté alojada alguna de estas personas, se suspenderá la entrada del público; al legar "Cristinaenea" a la Ciudad que a pesar de sus encantos, carece todavía de un paseo como la Florida, de*

139. *Registro de la Propiedad*. Ib. 97.

*Vitoria, la Isla, de Burgos, le lega los cuadros, plata, muebles, ajuar de casa, prohibiendo que se regale, cambie, venda cosa alguna de lo que hay en la casa y porque sean cuidados y conservados con todo esmero, le lega diez y ocho mil pesetas anuales; lega al mismo Ayntamiento de San Sebastián, su biblioteca de Madrid para que aumente la municipal y la insignia pequeña del Toisón de Oro para que la una a los varios recuerdos de hijos de Donostia que tiene en su Museo; instituye su único y universal heredero a la Provincia de Guipúzcoa, representada por su Diputación provincial y foral.*

Testuak badu zertaz iruzkinik egin, baina bere horretan uzten dugu hemen, egiatarren gozamenerako: Donostiaren maitale, Erakundeen ezagutzaile eta giza aldarteek zer-nolako aldakuntzak ekar ditzaketen zekienaren testamentua da hau. Hainbat puntutan, gure garaiok ezagutu balitu, zerbait aldatu ere egingo zuen beharbada Lasalak hilburuko hori, adibidez gau-pasa gehiago baita orain; baina, esan beharra dago, ezarritako baldintzek ongi babestu dutela Kristinenea, politika nahiz gizartearen kasketaldietatik, eta uste dugunez, herritarren onerako.

Testamentuan oinordekoei Lasala-k emandako Kristinenearen legezko gozamena haiek guztiek 1926ko uztailaren 6an utzi zuten osorik eta dohainik Udaletxearen eskuetan. Harez gero, ba, Hiriarena da Kristinenea, 1930ean Udalak herentzia onartzean eta 1936an egindako Erregistroko inskribatzean berretsi zen bezala.

Parkeak ez du 1920.az geroztik historia zainduegia izan: landareak nolanahi hazi eta zabaldu ziren, zuhaitzak lehortu, bideak hondatu, belardiak landare-sastrakaz estali, dena jardin zaindu izatetik baso zabar izatera iritsi. Udalaren lana izan da, 1991tik hona parkea itxuratzea, ahal zelarik jatorrizko egoerara itzuliz, eta landaredi nahastuari ordena apur bat emanez[140].

Parkearen gaur egungo egoera (1995) Udaletxeak argitara emandako argitalpen labur batean azaltzen da[141]. Lasalaren ondare hura gehituz joan da Udaletxea: 1929an, eztabaidan zegoen 734 m$^2$-ko saila erosi zuen, eta 1982an, ostera, beste 15.300 m$^2$-ko alorra. Estanketan 780 m$^2$ ditu parkeak, eta eraikinetan 1.300 m$^2$; beraz, gehitu egin dira hauek[142].

---

140. VARII 1995: 16-17.

141. VARII (1995): *Cristina Enea*. Donostia: Udala. 12-13. Hor esaten denez, Lasalak 78.979 m$^2$-ko barrutia utzi zion Udalari: ez dakigu datu hau nondik datorren, eta, egia esan, gaizki dagoelakoan gaude, Erregistroan garbiki ageri baita “ocupa una superficie total de treinta y siete mil ochocientos veinte y cuatro metros sesenta y tres decímetros cuadrados”. Bestalde, liburuska honen arabera, 94.960 m$^2$-ko orube eta lursaila bilduko lituzke orain Kristineneak.

142. VARII 1995: 13.

Jauregiaz eta beronen inguruaz ere badago zer esanik. Jose C. Osinalde-k 1890ean eraikia da oraingo jauregia, eta kapera 1906koa; jardinak Pierre Ducasse-k marraztu zituen (hau da, Gipuzkoa Plazako, Miramar Jauregiko eta Alderdi Ederreko jardinak eratu zituenak)[143]. Hemen bi lerrotan eman daitekeen hitzezko deskribapena baino egokiago izango du irakurleak Kristinenera bisitaldi bat egitea.

Mundaitz ez da Parke eder honetan bukatzen, Urumea alderako hegoa ez baitzen Lasala-rena, Olazabaldar familia zabalarena baizik. Hain zuzen hauenak izandako lurretan eraiki ziren hemen aurkeztu nahi ditugun 1960.etako bi eraikin handi.

### • Jesusen Bihotzaren Ikastetxea (1959)

Kristinenea eta ibaiaren artean, garai bateko baserrien lurretan, bi eraikin-talde daude elkarren ondoan, biak ere Irakaskuntzara emanak: Aita Josulagunek zuzentzen duten EUTG/ESTE eta Jesusen Bihotzaren Semeen Mundaitz Ikastetxea (gaztelaniaz “Colegio del Sdo. Corazón” deitua). Egiako ibai-ondoko hegal hau, ba, Donostiako beste Auzo bati, Ibaetari, aurrea hartuz, irakas-mundurako hautatu zen, zituen baldintza onez baliaturik[144].

Hirian zegoen Mundaitz, baina aski albora; ikas-lanerako giro sosegutsu bat izan zedin, lurralde zabal ederra zegoen libre (65.000 m$^2$)[145]. Ordutik hona, Mundaizko eremu honek berariazko garapena izan du, Egiako hiriztapen modernotik at geratua, tartean Kristinenea delarik, eta, eraikuntzen ondotik batez ere berariazko bere bide eta ibil-ohiturez ibili izan dena.

Jesusen Bihotzaren Semeen Ikastetxea izan zen Mundaitz-en lehenik jaso zena, eta guretzat esanahi zuzenagoa duena da, gainera, Atotxako komentuarekin izandako harremanengatik[146]. Esan dezagun, ba, honetaz zerbait[147].

---

143. Arsuaga/Sesé 1996: 181.

144. Kasu honetan, berriz ere, Ander Malumbres kazetariak eta J. M. Fernández Ikastetxeko Zuzendariak luzatu dizkiguten albiste-iturriei esker emango ditugu honi dagozkionak.

145. Orube guztiaren banaketa honela egin zen, azkenean: 35.000 m2 Mundaitz Ikastetxerako, eta 30.000 EUTG-rako. Ik. Ikastetxeko Urtekaria: *Anuario 1995-1996*: 15-17. or.

146. Ikastetxe honetako ikaslegoaren ardura pastorala frantziskotarren komentutik eraman izan zen, eta bertara bildu ohi ziren garai batean eskola horretako gazteak, aitortzak egin eta elizkizunetara.

147. Ik. SUESCUN JAUREGUI, J. M. (1984): “Orígenes del Colegio de Mundaiz”, in: *Colegio del Sagrado Corazón, Mundaiz. Anuario 1984-1985*. San Sebastián. 11-24. MALUMBRES IBISATE, A. (1992): “Historia del Colegio [del Sdo. Corazón]”, in: *Anuario del Colegio del Sagrado Corazón (Corazonistas). Curso escolar 1992-1993*. San Sebastián. 6-

. . .

Mundaizko orubeak eta Etxea, Unibertsitate- eta Irakas-*campus*etarako saldu ziren arte, Olazabaldarren familiari loturik egon ziren. XV-XVI. mendeetako agiri lekukoek Mundaitz Santiago Bideko erakundeekin lotzen zuten: Jerusalengo San Joan Ordenarekin, alegia (1447, 1470, 1502), eta Santa Katalinan zegoen (1301) Ordena bereko Gomendioetxearekin[148].

Olazabaldarren hemengo lehen albisteak 1711tik datoz gutxienez. Berauek jaso eta zaindutako eraikin zaharren artean, beren etxebizitzak eta ermita-kapera bat egon ziren (hemen Meza emateko baimena 1714koa da), eta Mundaitz aldeko lurretan geroztik desagertutako hainbat baserri ere bai[149]. Villa Mundaitz honetatik pertsonaia ezagunak pasa izan dira: Segura Kardinalea, Egino Santanderko Gotzaina edo Manuel Senante politikaria bezalako jendeak[150], izan ere jabeetako bat behintzat ez baitzen nornahi izan: Juan Olazabal Ramery (1860-1937), hamarkada luzetan integrismoaren buruzagia, eta Donostiako *La Constancia* egunkariaren sortzaile, jabe eta zuzendaria. Aipatuta daude, erdarazko liburuan, Atotxako frantziskotarrekin izan zituen harremanak ere, hauek urtetan izan baitziren Mundaitz Etxeko kaperau.

Jesusen Bihoztarrek Mundaizko Ikastetxea eraikitzeko lurrak 1957an erosi zituzten, eta 1959ko Bazkoaldian etorri ziren "Villa Mundaitz" izandakora lehenengo ikasleak, hain zuzen Kongregazio berak Sánchez Toca kalean zuen ikastetxe zaharretik (hau da, gaurko KM Kulturunearen atzeko kaletik). Besteak beste, Arantzazun ere eskurik izandako J. M. Zumalabe aparejadorea ibili zen egokitzapen-lanetan.

Gerora, 1964tik aurrera egindako eraikinei esker, 1973an etorri zen Mundaitza Sánchez Toca-ko ikaslego osoa: bi ekitalditan 3.606 eta 2.462 $m^2$-ko eraikinak jaso ziren, guztira. 1980ko hamarkadan joan dira osatzen gauzak: hokey-lekua (1981), etxe zaharraren berritzea (1985), Komunitatearen egoitzaren birmoldaketa, eta, azkenik, "Villa Mundaitz" bera erabat zaharberritzea (1991)[151].

---

. . .

22. ID. (1998): "40 aniversario en Mundaiz (1959-1999)", in: *Colegio Sagrado Corazón. Mundaiz Ikastetxea. Anuario 1998-1999*. San Sebastián. 6-9. Gogoan har bitez, gainera, aurreko beste urteetan, ia urteoro, Urtekari horretan emandako albiste historikoak, halanola, [MALUMBRES IBISATE, A.] (1995): "La adquisición de Mundaiz: 1955-1959", 1995-1996.ekoan (8-20. or.). Azken lan hau interesgarria da batez ere erosketa-aurreko gorabehera eta zailtasunak ezagutzeko; bertatik dakigu, gainera, Jesusen Bihotzaren irudia Anaiarteak formalki 1957an jargoiratu zuela etxe hartu berrian (17. or.).

148. Murugarren 1987: 7-8; Suescun 1984: 12-13.

149. Malumbres 1992: 10.

150. Suescun 1984: 14-15.

151. Malumbres 1998: 7-9. Aurrerago, Egiako Komunitate erlijiosoen albiste-laukia ematean gehituko dira Anaiarteari dagozkionak.

### • EUTG/ESTE Deustuko Unibertsitate-ikastetxea (1961, 1973)

Eta gatozen Mundaizko *campus* unibertsitarioaz zerbait esatera. Donostian bizirik izan zen 1950etatik aurrera lehenbailehen Unibertsitate-irakaskuntza sustatzeko gogoa, Euskal Herriak aspaldidanik zuen eske bati erantzun ahal izateko ere. Asmo hori bultzatuz, eta Deustuko Unibertsitatearen babes instituzionalean, Gipuzkoako Ikasketa Unibertsitari eta Teknikoak eratu ziren[152].

Bi ekitaldi ezberdinetan jasotakoak dira eraikinak, 1961ean eta 1973an, eta Miguel Oriol arkitektoaren proiektuei jarraikiz burutu ziren. Mundaizko eraikuntza konplexua izan zen, eta osotasun batean pentsatua, triangelu baten barnean emana. Alde batetik, Irakaslegoaren egoitza, sarreran bertan; alde batean, Liburutegia, eta bi erpinetan, Fakultateak, eta hegoan, ibai-ondoaren altzoa bilatuz, bilera-leku eta kiroldegiak. Eta ororen erdian, eliza.

Mundaizko eraikin-multzo hau Donostiako paisaiaren parte da jada, bere profil bereziarekin, eta Zuberoako elizak gogorarazten dizkigun eliz dorre hirukoitzarekin. Hiriko hersturetatik aldendua, plazer-leku baketsu bezala ageri da, bere eraikin ttipi eta handiren arteko harmonia egituratu batean. Egia esan, trenbide-gainetik zubia eman zitzaionetik, Mundaitz batez ere Hiri Erdialdera begira bizi izan da eguneroko joan-etorrian, Egiara baino areago[153]. 1995eko Plangintza Orokorrak eta orain Urumeako laugarren zubia izango den "Mundaizko Zubiak" aginduko du ondoko urte luzeetan.

### • Etxebizitzen eraikuntza

Egiak badu, orain nahiko albora geratu zaion Frantzia Hiribideko auzunea, hirigintzaren aldetik nortasun ageria duena. Bertako kalea txukun-berritu zenetik (1891), garbi ikusi zen, garai batean Gros-en bezalatsu, eraikin erresidentzialetarako izan zitekeela Geltokiaren eta ibaiaren tarteko eremu hori.

1891n I. Goenak prestatu zuen auzune horretarako eraikuntza proiektu bat "Proyecto de un nuevo barrio de la Estación en la ciudad de San Sebastián" izenpean[154]; baina dezente geroago burutu ahal izan zen auzune honetako eraikuntza. 1926an hasi ziren Geltoki aldekoak: Lizeo Frantsesa eta ondoko beste hirurak. Hiru arkitektoren eskuetatik datorki-

---

152. EUTG-ren sortze instituzionala ezagutzeko Arbunies 1995 ikus daiteke (begira beherago beronen aipu osoa).

153. Arsuaga/Sesé 1996: 195.

154. GOENA, I. (1891): *Proyecto de un nuevo barrio de la Estación en la ciudad de San Sebastián*. Koldo Mitxelena Kulturunean ikus daiteke.



**Mundaitz: ESTE eta Mundaitz Ikastetxea.** Mundaitz, Kristinenea Parkearen ondoan, Hiriko Irakaskuntza Auzoa izan da azken berrogei urteetan. Gaur egun ere Deustuko Unibertsitateak hemen du Donostiako bere egoitza, EHU Ibaetan lekutu den bitartean.

gu hemengo eraikuntza hau: R. Kortazar (1926: 11. zenbakia, adibidez), P. Gaiztarro (1934: Sta. Katalina aldeko hasierako dorreduna), E. Lagarde (1935: 4. zenbakia)[155].

Frantzia Pasealekuko etxarte honek nortasun berea du: batzuetan XIX. mendeko frantses arkitekturatik jasoa, bestetan Espainiara begira moldatua. Hirigintzaren aldetik, bi zubi handien artean, eta ibaiaren ondoko pasealekuarekin, batasun estimagarria du guztiak, etxe bakoitzak eta guztiek dituzten arkitektura balioak ahantzi gabe.

Eta trenbidea pasatuta, gatozen Atotxa aldera, bertako Pasealekuari eta Egia kaleari begiratu bat emateko. Lantegi eta etxe nagusiei dagozkienak esanda ditugu (frantziskotarren komentuaz, berriz, erdal testuan luze hitz egingo da); orain etxebizitzei buruzkoak bilduko ditugu.

Pasealekuaren bi aldeek bilakaera garbiki kontrajarria izan dute: zenbaki bakoitien espaloira bildu ziren Pasealekuko etxebizitza guztiak (beste aldean egon zen garai bateko Eskoletako etxebizitza kenduta); alderantziz, Pasealekuaren zenbaki bikoitietako aldea, 1960.etako urteak arte, lantegi eta olgeta-tokiena izan zen, hau da, Atotxako Dorrea eta inguru hurbileko etxeak eraiki ziren arte.

155. Arsuaga/Sesé 1996: 162-163.

Pasealekuan, lehenengo etxebizitza modernoen eraikinak bi muturretakoak dira: Villa Oteiza (*Presentación*) etxeari (1912…) eta 41-49. zenbakiei dagozkienak (1912…). Tarteko etxeak elkarrekin lotu gabe joan ziren egiten. Badakigu 1909an barraka bat ere bazegoela (Zezen-Plazako Sociedad de Fomento-rena). Eraiki-aldiaren muga bat 1925aren inguruan edo ezar genezake, hain zuzen komentua erakitzen ari ziren urteetan. Villa Taironeseko etxe-orubeek (Pasealekuko 27-39. zenbakietan kokatuak) eraikin berriak ezagutu zituzten (udal agirian 1923-1924.etakoak dira), eta 23-35.etako eraikuntza 1925ekoa da. Horrela geratu zen etxeztaturik espaloi hau[156].

Egia kaleko etxeek (kale-etxeekin ari gara, noski) zerbait lehenagoko historia dute, eta hori Egia Gainetik hasten dela esan daiteke: 28. zenbakidun etxea (1891…), 26.a gero (1898…), baina beste aldean, 15ean, bada eraikin goiztarren bat (F. Arrieta: 1895…). Oro har esan daiteke 1908-1920.ak emankorrak izan zirela, eta ordukoak dira 4-6. zenbakiak (1908…) eta 12-14-16 eta 24. zenbakiak (1909…); 18-20ak geroxeago etorri ziren (1924…).

Lehenengo etxeztapen honen ondoren, zahar-berritzeak ez ezik zaharberri trukaketak ere egin izan dira eraikin horietan. Ez gara horren guztiaren albistea ematen hasiko; baina bada etxebizitza kontutan hiriztapen-gertakari ezin baztertu bat, berrogei urte geroago: Atotxako Dorreari eta inguruko etxegintzari dagokiena.

Atotxako Dorrearen eraikuntzaren asmoa kaleratu zenean, handigogo luzeko proposamena izan zen hura: aldeko eta kontrakoek gogotsu jardun zuten, Hiriari ekar ziezaiokeen aurpegi modernoago baten premia aldarrikatuz, alde batetik, eta Donostiako egitura hiritarra eta bertako hiri-paisaia desitxuratu baizik ez zituela egingo, salatuz bestetik. Sustatzaileek zabaldutako paperetan, etxebizitzena baino gehiago eraikin berriak sortuko zuen merkatal zentro handiaren ideia saldu nahi izan zen: "*Torre de Atocha*, el Centro Comercial de San Sebastián y su Provincia", zioen horietako batek.

Hori gorabehera, proiektuak aitzina egin zuen, baina ez, juxtu, sustatzaileek esan zutenaren bidetik: jatetxe, supermerkatu, erakustoki, kafetegi, eta beste hainbat motatako merkatal eskaintzak bide-ertzean geratu ziren, guztiaren historia bertatik bertara ezagutu duen informatzaileak gogoratzen digunez[157].

Eraikuntzarako orubea 1967an erosi zuten Proiektuaren lehen sustatzaileek (Asesoría Técnica de la Construcción, ATC). Auzune honetako 32.

———

156. Datuak berriz ere kalez kaleko eraikinen Udal Artxiboko Inbentariotik jaso ditugu.

157. Hemen emango ditugun albisteak Faustino Sáinz Ortigosa-ri zor dizkiot, bertako kooperatibista eraikileen elkarteko lehendakari urtetan izandakoari.

Poligoko 1. sailean izendatu zen Dorrerako orubea. Lehen uneko arkitektoa Arizmendi jauna izan zen, eta laster J. C. Saralegi eta M. Oteiza arkitektoak egin ziren Proiektuaren kargu, lehen asmoari zenbait aldaketa ezarriz.

1968ko lehen hilabeteetan ireki zitzaien jabegoan parte hartu nahi zutenei izena emateko epea, eta bazkideek “Cooperativa de Viviendas Atocha” bat eratu zuten, eraikineko etxebizitzak eta merkatal lokalak saltzeko ardura eta xedearekin.

Eraikuntzari 1969an ekin zitzaion. Obretan urte beteko geraldi baten atzerapenarekin eta Udaletxeak bizigaitasun-agiria eman ondoren, 1974an sartu ziren jabeak etxebizitzetara. Beheko solairuetakoa gogoan hartuta, 40.900 $m^3$ ditu Atotxako Dorreak. Hemeretzi solairu dauzka etxebizitzatarako, eta beheko beste bietan merkatal zerbitzuetarako lekuak daude (14 lokal). Dorrean 116 etxebizitza dira daudenak (batezbesteko, 80ren bat metro karratukoak). Eraikin azpiko sotoan aparkalekua dago (32 beribilentzat). Diru-kontuetara gatozela, esan dezagun hasierako aurrekontuak bikoiztu egin zirela azkenean, eta 300 milioi kosta zela eraikuntza osoa.

Gaur egun zenbait etxebizitza hutsik dago, jabeak hil ondoren (txikiak direlako ere bai). 450ren bat bizilagun dago bizitzen eraikin honetan (1999). Irekieratik hona, 30ren bat lagun hil dira bertako bizilagunetarik. Jende heldua zen (40-50 urtekoa) lehendabizi hona bizitzera etorri zena, eta jada asko da erretiroa hartutakoa. 35 alarguntsa edo bizi dira bertan, eta agian lau baino ez dira gizonezko alargunak…

Egia Auzoko Dorrea da hau, nonahitik eta Hiri osoaren gainetik, ageri eta begira dagoena; hala ere, ez dirudi Egiaren etorkizuna Atotxako Dorretik biziki argi ikusten denik. Beharbada, argi hobeak izan ditzake Auzoak bestelako leku eta jardunetatik, kulturatik adibidez. Bestelako bide honetan, gainera, Auzoak eman du urrats berririk eta horren berri eman nahi dugu orain.

Eraikinen historia hau osatzean, Jareño lantegiarekin topo egiten dugu; baina hau errealitate bikoitza da: eraikuntzakoa eta kulturala. Alde biok begiratuko ditugu hemen.

Jareño sarraila-fabrika Donostiako Udalaren eskuetan geratu zen 1996an[158]. Ondoren bi arazo nagusi ziren argitu beharrekoak: sarraildegi zaharra nola egokitu kultur egoitza izan zedin, eta bertako kultur lanari zein jite eta egitarau eman.

---

158. Ondoren emango ditugun albisteak, ia hitzez hitz Jon Aizpurua-k eman dizkigu Kultur Udal Patronatutik; Aizpurua jauna eraikiera honen sustatzaile izan zen bere garaian, eta protagonista zuzena. Bere artxibotik ere eman dizkigun albisteokatik eskerrak eman nahi dizkiogu.

Arazo horiei erantzun egoki eta egokitu bat emateko bi elkarrizketa ireki ziren aldi berean: Udaletxeak arkitekto eta bere teknikariekin lokalaren egokitzapen-arazoak aztertu zituen, eta, horren parean, egingo zen Kultur Etxe berriaren eginkizuna definitzeko Udalak eta auzotarrek beste ideia-trukaketa bat hasi zuten. Ikusiko dugunez, bi elkarrizketa hauek batak bestearekin zerikusi zuzena zuten, eta ezin zitekeen bakoitza bere aldetik, beste gabe, eraman.

Udaletxeak hiru proiektu eskatu zizkien arkitektoei, 1988ko udan. Hasiera hartan Jareño Kultur Etxea kulturune berezitua izan zitekeela pentsatu zen, hain zuzen Arte Eszenikoetara eta Musikara emana, eta lehenik 1990ean aurkeztutako Enrike Muga-ren proiektua ideia horrekin asmatua zen. Hori, berez, ez zen, ba, Egiako Auzora begira zegoen zerbait, halabeharrez Egian suertatuko zena baino.

Etxearen planteamoldea 1991-1995.eko legealdian aldatu zen, Gurutz Larrañaga zinegotziaren garaian, eta azkenean, bestelakorik erabaki zen: zinez Egiako Kultur Etxea izan zedila, benetan Auzorakoa, nahiz eta espezializazio jakin bat ere izango zuen (hain zuzen, aipatutako Arte Eszeniko eta Musikarako berezitasunak barne zituela).

Hau dena elkarrizketa bikoitz baten emaitza izan zen: alde batetik, Egiako Elkarteekin izandakoarena, eta bestetik, Antzerki eta Musika Taldeekin bizi izandakoarena. Azkenik, 1997ko maiatzean ireki zen Egiako Kultur Etxe hau (eta beronen barruan, "Gazteszena" zeritzana, berriz, hurrengo urteko maiatzean). Horrela abiatu zen, ba, proiektu osoa.

Zein da orain Kultur Etxe honen leku sozio-kulturala, Donostiako Udalaren beste Kultur Etxeen artean (une hartako Casares/Altza, Larrotxene/Intxaurrondo, Loiola, Okendo/Gros eta Lugaritz/Antiguako Etxeen artean)? Bi xede ditu Etxeak: lehenik, Auzoko kultur bizitzari oinarrizko tresna bat eskaintzea, egiatarren ahaleginak errazteko asmoz, eta, beste Kultur Etxeetan gertatu ohi den bezala, Hiri osoari alor bereziren bateko zerbitzu orokorra eskaintzea (kasu honetan, Arte Eszeniko eta Musikakoa). Honela, Etxeak Auzora eta Hirira begirako jarduerak ditu, aldi berean.

Nola dago gidaturik Kultur Etxe honetako lana? Etxearen gain Udalak du erakunde-jabetasuna, eta bera da azken erabaki politikoak hartzen dituena; hala ere, Auzoko Elkarteekin izandako harremanetatik egiatarren presentzia bideratzeko modua segurtatu ahal izan da bertako bizitzan.

Etxearen kudeaketa eramateko moldea 1997an bertan erabaki zen. Zai Zoi Koordinakundeari eskatu zitzaion horretarako proiektu bat egin zezala. Proiektuko iradokizunak partez onartuz, Udalak Zai Zoiren eskuetan utzi zuen bi atalen kudeaketa, hau da, Egiako "Elkarteen Txokoa" zeritzan zerbitzua eta "Haurrentzako Jarduerak" zeritzana. Horretarako lan-

kidetza-hitzarmen bat sinatu zen. Gainerakoan, Udala arduratuko zen kudeakuntza orokorraz.

Estimagarria da Jareño Kultur Etxe honen dinamika. 1998ko jardueran 20.461 lagunek hartu du parte. Liburutegi-zerbitzuan 33.875 mailegu egin dira (eguneroko batezbestekoa, 141), 3.139 bazkide zituen liburutegiak urte horretan. Ia 300 ekitaldi antolatu ziren, asko eta asko Egiako eta Donostiako Elkarteen esku-hartzearekin.

Kultur Etxe honetako Dantza eta Musika Eskola dela eta, Kultur Etxeko zenbait zerbitzu ez da oraindik garatu, baina, Eskola hori lekuz aldatuko denean, eskueran izango dira espazio berriak, eskas diren gainerako zerbitzuak abian jartzeko.

Jareño Kultur Etxea lorpen ona izan da Auzorako, baina bada hortik plangintza orokorragorik ere, eta Auzoko aurpegi-berritze horri ere begiraturen bat eman beharko diogu.

### *2.3.4. Egia, Hiri-Ordenazioko Plan Orokorrean (1995)*

Arestian aski gogorarazi dugu Egian Plangintza Orokorrek izan duten presentzia edo despresentzia. 1995eko honek badirudi, une historikoagatik eta azken hogei urtetako eskarmentuak eskolatuta, pisuko eragin eta ondorioak izango dituela Atotxan eta Egiako Urumea-aldean. Ikus dezagun, ba, 1995eko Azaroaren 16an onartutako Plan Orokor honek eta ondoko agiri osagarriek zer dioten gure Auzoari buruz.

#### • Berriz ere Atotxa egiten, eta Hirira bideratzen

Bere ordenamendurako, Plan honek Egia 22 sailetan banatu du, eta “Egia” honen mugak nondik nora doazen esanik dago gorago, Auzoaren izenaz eta esanahiaz jardutean. Hogeita bi sail horietako bat interesatzen zaigu hemen berezikiago (*EG.5 Atotxa (II)* deritzana, alegia), berarekin dakartzan berrikuntza deigarriengatik, eta Egiaren Hiriko saihestasun erlatiboari molde berri batez gaina hartu nahi diolako.

*EG.05 Atotxa (II)* hori zera da: Futbol-zelai ohia hartzen du eta Iztueta kalera eta Frantzia Pasealekuraino iritsiko litzateke. Tartean, noski, trenbidea dago, baina horrixe bilatu nahi dio sail honetarako Plan Bereziak irtenbide berria, Egia behin-betiko Hirigunetasunean bete-betean gera dadin, eta ez jasan izan duen alboko baztertasunean.

Atotxak parada ederra du orain, Auzoaren hirikotasuna pentsatu eta birbideratzeko. Futbol-Zelaia, Fruta-Merkatua, Atotxako Pilotalekua zernahitarako daude orain, eta beste kasutan ere orube eta eraikinik bada Udalarena denik. Plan Berriak hori du gogoan.

Egia Auzoa Hirigunearekin hertsiki lotzeko xede nagusiari erantzuteko erabili nahi dira eskura dauden baliabideak: aipatutako espazio libreak, herri-orubeak eta lursail eraikigarriak, hauetara bil daitezkeen Hiri-zerbitzuak (Epaitegia, etab.). Egiari Hirian hirigunetasun hobea emateko, bide-zubiak ostera egokitu beharra dago, etxebizitzen eta ekipamenduen arloari ere erantzuten zaion bitartean.

Iztueta Gain-zubiarena eta trenbidearena dira, berriz ere, Egia Hiri-Erdialdearekin erosoki lotu ahal izateko oztopo nagusiak. 1995eko Plan Orokorrak, bere epe luzeko asmoetan, Iztueta Gain-zubia erabat kendu, eta Atotxatik Hirirako pasabidea trenbide azpitik eramatea proposatu zuen. Plan Berezia malguago agertu da, eta nahiago izan du bere proposamenetan oinezkoentzako irtenbideari lehentasuna eman, berebilentzakoa gerorako utziz.

Bide horretatik, “Atotxa Plaza” deritzan bat sortuko litzateke, Epaitegien Jauregi eta Plaza izango direnetatik Euskadi Plazarako iraganbidea *oinezkoen espazio zabal batu* bihurtuz, beti ere Gain-Zubiaren arkupeak hartuz eta trenbidea azpitik zeharkatuz. Irtenbidearen zabaltasun-erosotasunak segurtatzeko Iztueta kalea oinezkotu egingo litzateke, eta hau dena Zuhaiztiko libregune eta ondoko polikiroldegirako zabalgunera ireki.

Etxebizitza kontutan, berrikuntzarik handiena, noski, orain arte udal zerbitzuak zituzten orube eta eraikinen lekuetan dator: Futbol-zelaian, Fruta-Merkatuan eta Pilotalekuan. Eraikuntzarik beteenera joz, 392 etxebizitza berri sor daitezke hemen. Horrekin batera, 17.000ren bat $m^2$-ko eskaintza sor daiteke “hirugarren usadioetarako”, Epaitegien Jauregipeko merkatal galeriena kontatu gabe.

Atotxako Pasealekuaren beraren itxuraldaketa ere azpimarragarria da, bestalde. Atotxako zenbaki bakoitien espaloia zabaldu egingo da; kaminoari berari erdiko hesi-espaloixka banatzailea emango zaio, eta zenbaki bikoitien aldean “bide gorri” bat eratuko da. Oro har, Askatasunaren Etorbideko espazio banaketa izango du Duke de Mandas Pasealekuak, bere zuhaitz eta espaloi zabalekin.

Honainokoa Atotxarako proposaturiko Plan Berezitik jaso dugu (lehen onarpenerako Agiria: 1996ko Ekaina); orain ikusi egin beharko da zer den ondoko urteetan egikarituko zaiguna[159].

---

159. Eskerrak eman behar dizkiogu Iñigo Odriozola jaunari Planaren laburpen honetarako pasa dizkigun agiri eta albisteengatik, eta idazlan osoaren irakurle fin izan delako, hainbat iradokizun luzatuz, gainera.



**Egiako Plaza.** Zaila eta malkartsua izan da, batzuetan itogarria ere bai, Egiako hirigintza. Horregatik, urte batzuetatik hona barne-espazio berriak eratu nahi izan dira bere baitan. Hona hemen horietako bat.



**Trenbidea eta zubiak.** 1860ko hamarkadan trenbidea egin zenetik, Gros-etik Mundaitzeraino burdinbideak eragotzi du Donostiako Erdigune eta Auzoaren arteko harremana. Joanetorriok samurtzeko eraiki ziren puntu ezberdinetan zubi-zubiskak: Iztueta-ko gainbidea, Geltokiko zubiska nahiz azpibidea, eta, orain, Mundaitzeko zubia.

**• Urumea-Mundaizko etxebizitzak (1998-2000)**

Urumea aldean, trenbideari sorbalda emanez, etxadi luzeak datoz, hain zuzen trenbidea egin eta bere zerbitzuak zabaltzeko garai batean hartu ziren lurretan. Esan zaidanez[160], XIX-XX. mendeetan Renfe-k hainbat lekutan behar baino lur gehiago hartu ohi zuen, desjabetuta, eta horren ondorioz, Donostian eta Tolosan ere (Gipuzkoa bakarrik aipatzeko) premiazkoa zuen baino sail zabalagoa izan du eskuetan Renfe-k.

Hori zela eta, soberako lur horiek salmentara atera nahi izan zituen Konpainiak, 1980.eko hamarkadan. Egokiera horretaz baliatu nahirik, Eusko Jaurlaritza interesatu zen etxebizitzatarako erabil zitekeen Urumea ondoko orubeaz. Salmenta horrek bide ezberdinak har zitzakeen unean (babes ofizialeko etxebizitzetarako saldu, ala eraikuntza librerako erabili, alegia), irizpide politikoek agindu zuten eta, azkenik, egitarau babesturako geratu da lur hori[161].

Oro har, Renfe-ri orubeagatik eta bertako trenbide-egitura kentzeagatik ordaindu zitzaiona, 600en bat milioi pezetakoa izan zen. Jaurlaritzak bere erosketa egin aurretik, 1995eko Hiri Plangintzan Udaletxeak orubeari zein sailkapen emango zion segurtatu zen, etxebizitzatarako baliagarri izango zen ala ez aldez aurretik jakiteko.

Hasieran hamar etxadi eta 260 edo 280 etxebizitza pentsatu ziren proiektuan, azkenik zortzi etxadi eta 222 etxebizitza izango dira. Horiez gain, Geltoki ondoan bulegotarako eraikin bat jasoko da, eta etxadien beste puntan horren antzeko bigarren bat. Mundaizko laugarren Zubi berriaren parean, Amaratik Kristinenerako gain-zubixka bat egingo da trenbidea zeharkatzeko, azkeneko etxeen ondotik hasita.

Hori dena erabaki zelarik, babes ofizialeko aitorpen ofiziala 1998ko apirilean eman zaio etxebizitzen proiektuari.

**• Mundaizko Zubi berria (1998-2000)**

Urumearen gaineko laugarren zubi modernoa abian da jada, eta zuzenean Amara Berritik Mundaitza etorriko da; izena ere horixe izango du "Mundaizko Zubia".

Lehendabizi gogora dezakeguna zera da: aspaldidanik zegoela zubi hau eraikitzeko asmoa, eta Amara Berria zabaldu eta Anoetaraino eraiki denetik, are premia larriagoa zela Hirian laugarren zubi honena. Urumea

---

160. Jaurlaritzak Renfe-rekin izandako harremanen albisteak Jose Ramon Martikorena jaunari zor dizkiot (1999-11-15). Eskerrik asko bere berriengatik.

161. Salmenta bideratu zenean, PSOE zegoen agintzen Madrilen, eta Maturana Sailburu sozialista Gasteizen.

Pasealekuko etxadi berriena sustatu den aldi berean bideratu nahi izan da, azkenik, zubiarena ere. Horrela, finantzaketan bertan ere izan du batak bestearekin zer ikusirik: etxebizitzen eraikitzaileak 400en bat milioi jarri behar izan baititu zubia ere jaso zedin[162].

Burdinazko Zubia zaharberritu eta moldatu zenean (1932) Udaletxeko teknikari batek esan ere esan zuen “behin-behinekoa da berau, hau da, 20 edo 50 urtetarako baliagarri izan daiteke”. Teknikari eta igarle umoretsu hori ez zen orduan sobera nahastu, motz geratu baizik, esaten zenez laster batean (!) burdinazkotik 100 m beherako beste zubi bat egin behar baitzen. Azkenik, horri ere etorri zaio ordua XX. mende-hondarrean.

Mundaizko Zubia egiteko[163], ideia-lehiaketa baterako deia 1992an egin zen, eta hurrengo urtean jaso ziren erantzunak. eta azken hautua egin. Lehiaketa mugatua izan zen berori, eta bost laguni egin zitzaien parte hartzeko deia[164]. Guztien artean J. A. Fernández Ordóñez-ek irabazi zuen lehiaketa, eta berau izan zen, Julio Martínez Calzón-ekin batera, azken Proiektua egin zuena (1994 martxoan).

Lanek izan dute uste gabeko zenbait zailtasun ere. Esate baterako, zubiari oina emateko harkaitza ez zegoen, inondik ere, sakontasun berean bi ibaiertzetan; aitzitik, eskuinaldeko Urumea Pasealekuan 8 m-tara aurkitu zen harkaitza, baina ibaiko beste aldean, Bizkaia Pasealekuan alegia, 45 m-taraino zulatu behar izan zen harkaitza aurkitzeko. Beraz, Urumeatik Egia Gainerako garai bateko muinoak aldapa pikoa zuen, nonbait, puntu horretan.

Zubi berriko obrak UTE bati (Agromán-Galdeano) eman zitzaizkion, 1998an, eta lanei urte bereko azaroan eman zitzaien hasiera. Zubiko goihagak 1999ko azaroaren 2an eta 17an jarri ziren, eta, espero denez, 2000ko otsailean bukatuko da Araba Parkearen segida den obra hau.

Zubiko egitura bitarikoa da, hots, altzairuz eta hormigoi armatuz egina. Altzairuzkoak ditu goi-hagak (eta urreztatu egingo dira), eta hormigoizkoa gain-zorua. 80 metroko argi librea du zubiak, zutoin gabeko tarte bakarra alegia, eta zabalean 24 m ditu.

Ikusten denez, Hiriko beste zubi handien moldetik aldendu egiten da zubi berri hau, batetik altzairua horrela darabilelako, eta, bestetik, tarteko zutoinik gabe egin nahi izan delako. Badirudi Aurreproiektu hau hautatu zuen epai-mahaian, batez ere artistak (Txillida, Nagel) eta ingeniari

---

162. J.R. Martikorena-ren albistea.

163. Joakin Oroz jaunari (Udal bide-injinariari) zor dizkiogu ondoko albisteak. Eskerrak, ba, berari.

164. Deituak hauek izan ziren: Jose Antonio Fernández Ordóñez, Javier Manterola Armisen, Juan J. Arenas de Pablo, Santiago Calatrava Valls eta José A. Torroja Cavanillas.

teknikariak egon zirela Fz. Ordóñez-en alde, eta politikariek agertu zutela bestelako joera. 600ren bat milioi kostatu da zubia eraikitzea, eta 2000.eko maiatzean estreinatu da.

Horrela joan da, burutuz eta berrituz Egia Auzoko eraikuntza, bere etxe, lantegi, bide, kamino eta zubietan, eta 1995eko Hiri-Ordenazioaren arrastoan izango du Egiak aurpegikera apainduz joateko aukerarik, izan ere ez baita eskasa horren premia. Auzo honetan, ordea, egiatarrak dira interesgarrienak, baliotsuenak, eta horietxek aurkezteko izango dugu hemen orrialde hauetako hurrengo partea.

## Hirugarren Partea

## Egia-atotxarren Auzoa eta gizartea (1800-1998)
## El Barrio y la sociedad de los egia-atotxatarras

La tercera parte del estudio muestra el rostro humano del Barrio: su evolución poblacional a lo largo de dos siglos (1800-1998).

De entrada, se recogen las cifras de población generales del Municipio donostiarra, cifras que muestran una Ciudad de crecimiento galopante frente a lo que fueron los siglos precedentes (siglos XVI-XIX).

Como es de suponer, el desarrollo demográfico de Egia no ha seguido un ascenso regular constante en su desenvolvimiento, y, en todo caso, el calendario de sus vaivenes demográficos tiene rasgos propios. Desde unas cifras muy modestas (los 358 hab. de 1800) se pasó en siglo y cuarto a 5.081 (1925), para iniciar al filo de la Guerra Civil un ascenso rápido hasta más o menos mediados de los ’70.

Se exponen los datos ofrecidos por las fuentes oficiales disponibles de 1975 y 1996 en sus datos generales básicos, por edades y sexos, por la tipología familiar, dando referencias comparativas para otros Barrios como Gros y Herrera; se examina la población de donostiarras de nacimiento e inmigrantes, las profesiones de los vecinos.

Puede resultar de interés conocer el mundo de los servicios, bien dirigidos al propio Barrio, bien a la ciudad en general, y el grado de autosuficiencia del Barrio en cuanto a los mismos.

La aproximación estadística hecha para 1975 se repite para 1996, casi veinte años después, constatándose un descenso en sus estadísticas de población, al socaire sin duda de una nueva definición del Barrio por los Padrones municipales pero respondiendo también a una coyuntura demográfica adversa. Las pérdidas son notables a lo largo de las dos décadas señaladas (1975-1996).

Nuevamente puede verse (1996) la relación “donostiarras/inmigrantes”, así como aspectos nuevos, referidos en este caso a los niveles de estudio de los vecinos, tanto de hombres como de mujeres. Cuadros estadísticos al respecto procuran situar el Barrio de Egia entre otros de San Sebastián.

Queda, así, definido el rostro poblacional cambiante del Barrio de Egia a todo lo largo de los dos siglos de la Edad Contemporánea.

Orain arteko orrialdeetan bi alde nagusi begiratu ditugu, Egia-Atotxako historia ezagutu ahal izateko: Auzoaren giza jatorria eta auzoko eraikuntzaren bilakaera hiritarra.

Horrela, lehenik, behinolako izaera gogoratu dugu, Egiako historia betiere Donostiako gainerako Auzoenenean lekutuz. Bigarren, Auzo moderno berriaren hiriztapen-segida begiratu da, bere eraikuntza fisikoan batik bat. Donostiako hedapen-oldar azkarraren berezko ondorio bezala ikusi dugu Egia modernoa.

Baina Auzo bat ez da eraikin fisikoa bakarrik.

Egia, beste edozein herri edo auzoren antzera, batez ere gizakien, gizon-emakumeen, egoitza da: herritarren bizilekua.

Ikusi ditugu jada Egia zaharreko auzotarrak, eta Erdi Arotik XIX. mendea arte nola zeuden banatu-antolatuta, beren baserri, etxebizitza eta lantegietan. Egiatar haien oroitzapena ez dugu galduta utzi nahi izan.

Auzoaren XIX-XX.etako hazkundeak, ordea, bestelako gizarte berri bat sortarazi du, eta Auzo eta gizarte berri hauei eman beharko diegu orain begiratu bat.

* * *

## 1. Demografia historikoa (1800-1998)

Donostiako historia demografikoaren barruan, eta beronek Aro Garaikidean izan duen bilakaeraren baitan lekutu behar da Egia Auzoko biztanleriari dagokiona ere, Hiriko historia orokorrak baldintzatu baitu, nahitaez, Auzo honetako gertabidea. Horrek ez du esan nahi, hala ere, bi eboluzio horiek (Hirikoa eta Auzokoa) kronologikoki nahiz beren arrazoietan guztiz parekideak izan direnik (aitzitik, bestelakorik izan baita), baizik eta prozesu orokorrak sakatu edo sustatu duela Egiakoaren ibilera, beti ere Hiriko, nahiz eskualde edo Probintziako, bilakaera edo interes orokorren arabera.

Baina, esaten dugun horregatixe, Hiria eta Auzoa oso loturik daude beren aldakuntzetan. Horregatik argigarri izango da lehendabizi Hiriaz, oro har, oharren bat edo beste egitea.

### *1.2. Donostiako demografiaz zenbait datu*

Donostiako biztanle-hazkundeak Aro Garaikidean izan duen goraldia, aurreko mendeetakoekin alderatuta zeharo berri bezala ageri zaigu. Izan ere, XIX-XX. mendeetako abiada bizkortzea zinez iraulketa izan da, Hiriko historian.

DONOSTIAKO BIZTANLERIA (1587-1787)[1]

| *Urtea* | *Udalerria* | *Hiria*[2] |
|---|---|---|
| 1587 | 8.165 | 7.242 |
| 1733 | 7.798 | 5.887 |
| 1768 | 11.503 | 9.202 |
| 1787 | 11.833 | 8.466 |

Ikus daitekeenez, bi mende horietan biztanle-hazkundeak behera ere egin zuen, lehendabizi, gero XVIII.eko bigarren partean hazpide estimagarri bati bide emateko. Baina abiadak beste tamaina bat hartuko zuen hurrengo mendean. Hala ere, hazkunde hori ez zen berehalakoa izan, eta agian behera ere egin zuela esan liteke, zeren Anabitartek dioenez, 5.488 bizilagun baitziren murru-barnean 1800 inguruan.

Bestalde, 1813ko sutearen ondoren, urteak eman behar izan ziren, lehengo tamainara itzultzeko: 1838an, harresi-barruko jendetza 6.091 lagunekoa zen. Murruak eraistear zirenean, Donostiak murru-tartean 9.047 biztanle zituen, eta Udalerri osoan 15.911 (1857)[3]. Aurreko orrialdeetan ikusi dugu udalerritarrak zein banatuak zeuden udal-barruti osoan. Ondoren, mende oso batean hazkunde horrek nolako bizkorraldia izan duen jakiteko aurreko grafikoak iradokiko digu nondik norakoa, 1877ko 100 basetik 800eraino igo baita marra estatistikoa Donostian (1975)[4]:

DONOSTIAKO BIZTANLE-HAZKUNDEA (1877-1975)



Gómez Piñeiro 1982: III, 168 (azpiko grafikoa)

---

1. Iturria: PIQUERO, S. (1991): *Demografía guipuzcoana en el Antiguo Régimen*. Bilbao: UPV. 104.

2. *Hiria* = Hiriko hiru Parrokiak. *Udalerria* = Hiria, baina Altza, Igeldo, Aduna eta Pasaia San Pedro ere barne direla.

3. ANABITARTE 1903: 299-300.

4. GÓMEZ PIÑEIRO 1982: III, 168.

XX. mendeak indarberritu baizik ez du egin, ba, biztanle-hazkunde hau, eta nolako presaz, gainera. Hona ibilera horren zinuak, zifratan:

DONOSTIAKO BIZTANLERIA (1857-1991)[5]

| *Urtea* | *Biztanleak* |
|---|---|
| 1857 | 15.911 |
| 1877 | 21.355 |
| 1900 | 37.812 |
| 1930 | 78.432 |
| 1950 | 113.776 |
| 1970 | 165.829 |
| 1991 | 176.019 |
| 1996 | 176.908 |
| 1998 | 178.248 |

Horrela, ba, mendez mende milakada batean 10./15.000 lagunen azpitik izandako biztanleria hogeigarren mende honetan kopuru horietaraino igo da, horren aurreko historia osoa hautsiz, testuinguru demografiko orokor berriaren barnean. Eta, bien bitartean, zer gertatu da Egiako Auzoan?

### *1.2. Egia hazten: mantso, eta azkar (1800-1975)*

Egiako demografiaren historian, hiru epealdi ezberdin muga daitezke azken bi mendeetan, eta horietako bakoitzak aurpegiera kontrajarri eta berariazkoak ditu:

1) Hazkunde mantsoko hamarkadak (XIX. mendean: 1800-*c.* 1900).).

2) Hazkunde azkartuko hamarkadak (1901-1975).

3) Biztanleriaren beheraldia (1975-1996).

Hortaz, atzerapen batekin izanik ere (Hiriko biztanleria orokorra lehenago hasi baitzen bizkorki hazten), Egia ere demografia hiritar modernoen arrastoari jarraiki zitzaion, gero, azken bi hamarkadetan, aldi berri batean sartzeko.

---

5. Iturriak: 1857koa, urte bereko Zentsuaren araberakoa da (ik. MUTILOA POZA, J.M. (1982): *Guipúzcoa en el siglo XIX*. San Sebastiám: CAP. 234-236.); IGE (1879): *Resultados generales del Censo de la población de España, según el empadronamiento hecho en 31 de diciembre de 1877.* Madrid. 206-209 (izatezko biztanleria); INE (1987): *Poblaciones de hecho de los municipios españoles, según los Censos oficiales de 1900 a 1981*. Madrid. 201-205; INE (1992): *Poblaciones de derecho y hecho de los municipios españoles. Censo de población de 1991*. Madrid. 135.

Aro Garaikidearen atarian (1800), Egia-Zamarrak 69 etxe zituen eta 359 bizilagun, haur eta helduen artean[6]. Gutxi, noski, guk ezagutu dugun Egiatik begiratzen bada; hala ere, mende-erdi pasatxo bat geroago (1857), 900 ziren egiatarrak (hiriko %5,66). Zenbaki absolututan kopuru txikia zen hau ere, baina portzentaia handi bateko hazkundea zekarren horrek: 1800etik 1857ra, Egia %250 hazitzeraino iritsi baitzen. Azken urte horretan, Donostiako herri-auzoen artean laugarrena zen biztanlez; aurretik zituenak zerak dira: Hirigune zentrala, Altza eta Amara, hau 921 lagunekin. Loiolak urte berean, 322 bakarrik zituen[7].

Hogeita hamar urte geroago (1887), irakurketa zaileko informazio batean, Egiako bezala ezagutu ahal izan ditugun etxeetan 1.083 bizilagun ageri zaizkigu, 24 etxe edo auzogunetan[8]. Horren osagarri bezala, badakigu, 1890eko Zentsuaren arabera, "Atocha escuelas" zeritzan hautes-barrutian 479 hautesle zeudela, baina kasu honetan Ulia eta Gros ere barne zeudenez, ez da hori informazio baliagarria gurerako. Dena den, bi albiste azpimarra daitezke agiri honetan: a) 69 eraikin zeuden Egian (1890), eta b) Lehenengo fabrika-lantegiak izendatuki ageri dira (zerrategi bat, teila-fabrika, etab.; Zezen-Plaza ere aipatuta dago)[9].

Berrogeiren bat urte geroago (1925), Egiako barrutiko bezala eman datuetan biztanleria honela zegoen banatuta:

EGIA BERE AUZUNEETAN (1925)[10]

| *Auzogunea* | *Biztanleak* |
|---|---|
| Erdigunea eta hedagunea | 226 |
| Geltokia | 20 |
| Atotxa | 2.033 |
| Erreka | 1.232 |
| Sakabanatuak | 1.570 |
| ***Orotara*** | **5.081** |

6. ANABITARTE 1903: 178.

7. Anabitarte 1903: 200; AGUIRRE SORONDO, A. (1987): "Estudio sobre la evolución demográfica de San Sebastián en el período 1846-1981", in *BEHSS*. 1987, 152-153.

8. Ik. AGUIRRE SORONDO 1987: 156-158. Ez du honek irakurketa erraza, eta goian emandako Egiako baserri-zerrendaren arrastoan eta Tellabide 1995 aurrean dudala egin dut etxe- eta auzo-zerrenda honen irakurketa "egiatarra". Egiatar seguruak bakarrik hartu ditugu zenbaketa egiteko, hala ere hona pare bat ohar osagarri: Erruki -Etxeko lagunak ere kontatuta daude (364); zerrendan "edificios diseminados" bat ageri da: horietako batzuk egiatarrak ere izan zitezkeen, baina ezin izan ditugu gurerako jaso.

9. AGUIRE SORONDO, A. (1984): "Censo de San Sebastián de 1890", in: *BEHSS*. 1984, 331-332.

10. Anabitarte 1971: 234. Ditugun argibideetatik zaila gertatzen zaigu aurreko estatistiketako "Egia" eta beste hau Auzo eta errealitate sozial bat beratzat ematea; hala ere, zifra eta kopuruen gorako logika agerian dagoela uste dugu.

Lauki honek interes ezbderdinak ditu guretzat, hemen: frantziskotarren komentua eraikitzen ari zen urteetako datuak baitira. Ikusten da, Atotxak jada pisu erlatibo handia duela Auzoan (%40), baina biztanleria sakabanatua (baserriak ia dena, uste dugunez) ez da batere mesprezagarria (%31).

Gerra pasatu eta gero, Egiak gorakada bortitza erakusten du, zinezko hazkuntz prozesuan sartuta baitzegoen jada Auzoa, 1945etik aurrera: 12.000 bizilagun zituen Egiak 1950ean[11]. Ondoko urteetan, Egian noski, eta inguruko beste zenbait Auzotan ere garapen-garaia izan zen hura, eta 1970etako hamarkadan epealdi demografiko-ekonomiko oso bat burutu zen.

Urte ezberdin horietako bizilagun-kopuruak batera ekarriz honako lauki hau izango genuke hazkunde demografikoaren laburpen gisara:

EGIAKO BIZILAGUNAK (1800-1996)[12]

| *Urteak* | *Biztanleak* |
|---|---|
| 1800 | 359 |
| 1857 | 900 |
| 1887 | 1.083 |
| 1925 | 5.081 |
| 1930 | 5.291 |
| 1950 | 12.000 |
| 1975 | 20.082 |
| 1986 | 15.471 |
| 1996 | 13.291 |

Elkarren segidan gure egunak arte datozen kopuru horiek iruzkinik franko sor lezakete, noski, beren gora-behar horrekin; baina, 1996raino luzatu ditugun arren, ez diogu orain gure ibilaldi historikoari aurrea hartu behar. Gauden, ba, oraingoz 1975eko datak ezartzen digun muga horren aurrekoetan.

Zifra koantitatibo horien ondoan, gogoz ezagutu nahiko luke batek alde koalitatiborik ere. Auzotarren alfabetatzea nolakoa zen, adibidez. 1890eko Zentsuak dakar horren berririk, Hirirako eta Egiarako ere. Donostiako hautesleen artean % 63k bazekien irakurri eta idazten, baina % 36 zen horretan alfabetatugabea[13]. Hautesleen alfabetatze-eza ogibidez edo Auzoz

---

11. *Futuro urbanístico 1980*: 73.

12. Iturriak: Gorago, puntuz puntu aipatu ditugun iturriak, eta berehala beren tokietan adieraziko ditugunak. 1930eko zifra: Aguirre Sorondo 1987: 165 (Egiako Galtzara eta Polloe ere Egiara bilduta).

13. AGUIRRE SORONDO 1984: 315.

begiratu nahi bada, hona ohar batzuk: nekazari, soldatadun, enplegatu eta arrantzaleak dira analfabetismo altuena dutenak.

Eta alfabetatzea, Auzoz Auzo ikustea nahiago bada, berriz, bi alde nabari bereizi behar dira garai hartako Donostian: Hiria, bere inguru hurbilenarekin, alde batetik, eta bestetik, Auzo urrunago zenbait. Hauen artean ditugu Amara-Lugaritz (% 86 alfabetatugabe), Igeldo-Ibaeta-Zubieta (%73). Egia ez dago horrelakoen artean, beste taldean baizik.

Hiriko eremu bilduan, Alde Zaharreko "Santa Maria" deituriko hautesbarrutia da analfabetoena (% ia 52). Berorretatik nahikoa hurbil dago Egia-Gros-Ulia: bertako 479 hautesleetako % 49 baitzen irakurtzen eta idazten ez zekiena; azken bi barruti hauen ondoren datorrena askoz aurreratuagoa ageri da (San Martinetik Kontxarako barrutia: 496 hautesleren artean % 33 ziren alfabetatugabeak)[14]. Bukatzeko, esan dezagun Auzoan bazegoela Eskolarik, hain zuzen Ulia-Gros-Egiakoa Atotxan baitzegoen, eta Goikoa-k egindako pilotaleku-ondoko etxean.

Bildu ditugun albiste hauetan ageri denez, Auzoko bilakaera demografikoa betiere ikuspuntu urri batzuetatik aurkeztuta ageri zaigu, hauteszentsuek beren xede mugatua zutelako noski. Besterik izan daiteke, ordea (zerbait osoagorik esan nahi dugu), Udal Erroldetako itaunketak hornituagoak ditugunetik, eta berorien ustiapena eskura eman zaigunetik. Horregatik, 1975eko eta 1996 Erroldak hautatu ditugu Egiako biztanle-historian epealdi mugarria den bat ezagutzeko.

## 2. Egiako Auzoa 1975ean

Udal Erroldei esker, azken bi hamarkada biziki aldakorretan Egiak ezagutu dituen aldarte sozial eta demografikoak deskribatzeko aukera dugu. Ez gara hasiko 1975-1996.etako Zentsu eta Errolda guztiak aztertzen (bospasei izan baitira urte horietan: 1975, 1981, 1986, 1991, 1996), baina bi muturretako urteak begiratuz ikusi ahal izango dugu Auzoa, denboraren harian sortutako egoera hain aldenduak elkarren kontraispiluan ikusteko abagunea eskaintzen baitigute 1975 eta 1996.etako Erroldek.

### *2.1. Egiako bizilagunak*

Ez dugu hemen azterketa sakon eta soziologikoki berezitura pasatzeko asmorik; baina zenbait datu argigarri behinik behin aurkeztu nahi da, Egiak Hirian izan duen auzo-nortasuna agerianago jartzeko.

14. AGUIRRE SORONDO 1984:

### *2.1.1. Biztanleria, oro har*

1975ean, Egiako bizilagunak 20.082 ziren, auzogune eta parrokia ezberdinetan banatuak. Besteak beste, Atotxako Dorrearen eraikuntzaren ondorioz biztanleriaren dentsitatea berriz ere gora egin berria zen (km$^2$-ko 163 lagun); hala ere, ez zen Egia Donostiako Auzoetan biztanle-trinkotasunik handiena zuena, eta Gros (354), Amara Berria (337), Erdialdea (212) edo Alde Zaharra (191) bere gainetik zituen[15].

Egiako biztanlego hori hiru adin-multzo nagusitan ematen badugu, ondoko zifra hauetan banatuko genituzke Auzoko bizilagunak:

EGIAKO BIZTANLERIA, ADIN-MULTZOTAN BANATUA (1975)[16]

| *Adin-multzoak* | *Emakumezkoak* | *Gizonezkoak* | *Guztiak* | *Portzentaiak* |
|---|---|---|---|---|
| 0/17 urte | 2.855 | 2.873 | **5.728** | 28 |
| 18/64 urte | 6.946 | 5.691 | **12.637** | 63 |
| 65/… urte | 670 | 1.047 | **1.717** | 9 |

Portzentai multzo horiek (28/63/9) sendotasun eta osasun ona ematen zioten Egiari: ez zen biztanlego sobera gaztea, eta zahartze-joera punttu bat ere bazuen, baina, artean, zindotasun ona erakusten zuen, eta etor zitekeen atzera-joerarik ez zuen artean aditzera ematen.

Lehen adin-multzoko datua (% 28) Donostiako beste zenbait Auzotakoekin alderatzen baldin badugu, portzentaiaz Egiaren gainetik zeudenak hauek ziren 1975ean: Herrera (% 38), Altza (37), Intxaurrondo (34) edo Loiola-Martutene (34), erbesteko etorkinen bizilekutzat eman ditzakegunak, baina baita beste hauek ere: Amara Berria (35), Aiete (35), Igeldo (34). Gainerako Auzo donostiarrak gogoan ditugula, Egia bere gazte-portzentaiarekin erdi-mailan zegoen Hiriko Auzoen artean, izan ere atzetik (eta oso atzetik ere bai) baitzituen beste hauek: Erdialdea eta Alde Zaharra (22), eta Gros bera (25), adibidez, Ulia-Ategorrieta parean geratzen baitzen (28). Intxaurrondon bezala Aieten etorkinen olatuak gaztetu egiten du biztanlegoa (erbestetik nahiz Euskal Herritik etorrita). Egiaren kasuan, migrazioa lehentxeagotik zetorren, eta biztanlegoa aski egonkortua zegoen jada.

Bigarren adin-multzoari begiratzen badiogu (% 63), hor ageri da biztanlegoaren aipatutako zahardade-punttu hori, hain zuzen Egia baitzen

15. 1975eko Udal Erroldaren araberako datua. Ik. URBANISTES ASSOCIATS (1978b): *Plan General Municipal de Ordenación de San Sebastián. Base económica y asentamientos territoriales*. San Sebastián. 75; Gómez Piñeiro 1982: I, 117.

16. Urbanistes Associats 1978b: 80.

Hiriko Auzo guztien artean bizilagun helduetan ehuneko altuena zeukana, eta ondoren berehala zetozenak Aiete eta Intxaurrondo ditugu (60), Alde Zaharra eta Gros (59), etab.

Hirugarren adin-multzoaz ari garela (% 9), ordea, Egia erdi-maila batean ageri zaigu. Badago, noski, zaharretan portzentaia apalagoa duen Auzorik; honelakoen artean daude, pentsa daitekeenez, Herrera, Aiete eta Intxaurrondo (6). Adineko bizilagunetan, Egian baino ehuneko altuagoak ditugu zinez zaharragoak diren Auzo hauetan: Erdialdea (21), Alde Zaharra (19), baina baita Gros (16), Amara Zaharra (15) eta Ulia-Ategorrieta bera ere (13).

### *2.1.2. Familien tipologia*

Eta beste galdera bat: Nolakoak ziren egiatarren sendiak? Nolakoari baino gehiago zenbatekoari begiratuko diogu. 5.472 familia zeuden Auzoan, eta famili unitate bakoitzeko kopuru-batezbestekoa 3,66 lagunekoa zen. Batezbesteko hau, Donostia osoan 3,44koa zen, eta Auzoetako apalena Alde Zaharrekoa (2,9). Igeldo (3,92), Ulia-Ategorrieta (3,73) eta Herrera (3,70) ziren famili lagunetan kopuru altuenak zituzten Auzoak[17].

Egiako famili unitateak ondoko gisa honetan zeuden banatuta, gune tipologikoen arabera:

EGIAKO FAMILIEN SAILKAPEN TIPOLOGIKOA (1975)[18]

| *Familia tipologia* | *Kopurua* | *Portzentaia* |
|---|---|---|
| Senar-emazteak haurgabe | 834 | 15,9 |
| Senar-emazteak haurrekin | 3.106 | 59,2 |
| Aita haurrekin | 55 | 1,0 |
| Ama haurrekin | 303 | 5,8 |
| Buru-bakarrak | 932 | 17,8 |
| Lagun-bakar taldedunak | 18 | 0,3 |
| **Orotara** | **5.248** | **100** |

Familia buru-bakarren kopurua oso altua zen Egian: 932, ia % 18a. Ohartzekoa da, guraso haurdunen artean, amak direla 303, aitak alderantziz 55 dira. Bestalde, franko senar-emaztek (834) ez du haurrik.

---

17. Astigarraga (3,80), 1975ean Donostiako Auzoa zen arren, eta Zorroaga-Miramón, bere izaera sozio-hiritar bereziagatik, ez ditugu hemen kontuan izan.

18. Familia guztien tipologia ez da markatu ahal izan; alde hori ezagutu ahal izan zaienen kopuruaren gain egin da laukia. Erroldaren arabera geuk landutako laukia. Ik. Urbanistes Associats 1978b: 82.

Donostiako Auzoen artean, familia tipologiaren banaketa soziala nola ageri zen alderatzeko ondoko laukiak lagun diezaguke. Alde batetik, Herrera aukeratu dugu, bertako familien kopurua (4.961) Egiakoaren antzekoa zelako, eta berorien tamaina ere bai (kasu honetan, unitateko 3,70); bestetik, Gros aukeratu dugu, Egiarekin duen auzotasunagatik, baina baita beronekin dituen portzentaia kontrajarri batzuengatik ere. Hona datuak:

**Egia, Herrera, Gros:**

FAMILI MOLDEEN PORTZENTAIAK: AUZOEN ARTEKO ALDERAKETA (1975)[19]

| *Familia tipologia* | *Herrera* | *Egia* | *Gros* |
|---|---|---|---|
| Senar-emazteak haurgabe | 15,0 | 15,9 | 18,8 |
| Senar-emazteak haurrekin | 67,0 | 59,2 | 45,9 |
| Aita haurrekin | 1,0 | 1,0 | 1,7 |
| Ama haurrekin | 5,0 | 5,8 | 7,7 |
| Buru-bakarrak | 11,8 | 17,8 | 25,6 |
| Lagun-bakar taldedunak | 0,2 | 0,3 | 0,3 |

Portzentaien hiru zutabeetan ikus daiteke, aukeratutako bi Auzo horien artean, Egiak dituen antz eta aldeak zeintzuk diren. Oro har, Herrera askoz hurbilago dago Gros baino, familia tipologiaren aldetik: Senar-emazte haurdunekoen portzentaietan urrunduta eta bi muturretan ageri dira Herrera (% 67) eta Gros (% 45,9), Egia, aldiz, erdian edo dago bitartean; familia buru-bakarretan ere Egia erdian geratzen zaigu (% 17,8), baina kasu honetan besteen portzentaia altua Grosekoa da, ez Herrerakoa.

### *2.1.3. Donostiarrak eta etorkinak*

Eta gatozen behin baino gehiagotan gogoratu izan den alde demografiko batera: 1975eko Egiako bizilagunak etorkinak ziren, ala donostiarrak gehienbat?

Oro har, Donostiako bizilagunetako erdia edo kanpotarra zen urte horretan, idatzi izan denez. Loiola, Intxaurrondo eta Altza ziren, kanpotarrenak bezala ageri zitzaizkigun Auzoak; aldiz, Alde Zaharra, Antigua, Amara Berria edo Igeldo ziren jaiotzez donostiarrenak. Bien bitartean, gainerako Auzoen kasua nahasiagoa zen[20].

Egia bere jaiotzezko donostiartasunean, inoiz bestelakorik uste izan arren, Hiriko batezbestekoaren gainetik zebilen askotxoz: Egiako auzotarren artean 9.573 zen jaiotzez donostiarra (% 48); Donostia osoko batezbestekoaren inguruetan zebilen, beraz, Egiako etorkinen portzentaia, eta

19. Iturria: Urbanistes Associats 1978b: 82. Geuk landuta.
20. Urbanistes Associats 1978b: 89-90.

donostiartasun horretan Gros-en azpitik (% 52) baina Herrera (% 46) edo Altzaren (% 43) gainetik zegoen.

Agian, hamarkada eta erdi lehenago handiagoa izan zen Egian etorkinen (jaiotzez auzo-kanpokoen) pisua[21], eta urte gutxi batzuk lehenago hasitako donostiartze-prozesu baten emaitza dela uste dugu, 1975eko egoera hori. 1965aren ingururako, burututa zuen Egiak etorkinek ere lagundutako hazkunde demografikoa, eta ondoko etorkin-uholdeak gutxiago ukitu zuen Auzo hau; horrela, Egia-Atotxako garai bateko etorkinak hilda ziren eta/edo beren seme-alabak bertan jaio eta hazi-kozkortuta zituzten, eta batzuetan adin heldukoak ere bai.

Dena den, bukatzeko, etorkinak esatean, Dosnostiatik kanpoko guztiez ari garela izan behar da gogoan. Datu alderagarri bezala beharbada balio du ondoko honek: 2.257 ziren Egian, donostiar izan gabe Euskal Herrian jaiotakoak, eta 2.552 beste sorlekuetatik etorriak[22].

### *2.1.4. Egiatarren ogibideak*

Jaiotzez, jatorriz edo bertara etorriz donostiar ziren egiatar hauek guztiak, nondik bizi ziren, zein lanbide izan ohi zuten? Egiako Auzoa, beste Auzo donostiarren artean, erdi-maila batean edo zegoen bere lanbide-*standing*-aren aldetik. Altzaren gainetik, Intxaurrondoren paretsuan. Herrera edo Altzako jendetza aktiboa, berriz, batez ere peontzan edo obrero arrunt nahiz berezituen lanetan zebilen[23], Egian goragoko egoera edo joera zen nabari. Ondoko datuetan ikus daiteke hori:

EGIA: JENDETZA AKTIBOAREN LANBIDE-SAILKAPENA (1975)[24]

| *Lanbide-maila* | *Lang.-kopurua* | *Portzentaia* |
|---|---|---|
| Peoi eta obrero ez-berezituak | 1.433 | 7,14 |
| Obrero berezituak | 3.046 | 15,17 |
| Merkatariak. Funtzionariak | 3.135 | 15,61 |
| Profesiodunak. Goi-funtzion. | 415 | 2,07 |
| Enpresariak | 42 | 0,21 |
| Jendetza ez-aktiboa | 11.758 | 58,54 |
| Ez dakigu | 253 | 1,26 |

21. Erroldetako azterlan luzeagotan sartzerik ez dugu izan, oraingo honetan.

22. Datu hauetarako iturria 1975eko Udal Errolda izan da, jatorrian, baina guk zera erabili dugu: Urbanistes Associats 1978b: 75, 93 (zoritxarrez, orrialde honetako laukietan ageri diren portzentaiak ezin izan ditugu argitu, eta emandako ehunekoak geuk kalkulatuak dira, bi orrialde horietako datu absolutuen arabera).

23. Urbanistes Associats 1978b: 84, 86.

24. Urbanistes Associats 1978b: 87-88.

Azpimarratzekoa da merkatarien edo dendarien eta funtzionarien presentzia zabala (3.135 lagun multzoan). Hurrengo mailan (profesiodunak, goi-funtzionariena) kopurua behera dator nabarmenki, baina Erroldak "enpresari" bezala bildu zituenen taldea (zenbakiak bestelako itxurarik ematen duen arren) ez dago batere gaizki (seguraski, Auzoko zerbitzu-egituraren oihartzuna da). Donostia osoan, Altza kenduz gero (1.517), Egia da zifra absolututan peoi eta obrero ez koalifikatu gehien duena (1.433).

Hala ere, Egiako biztanleriaren lanbidezko Auzo-nortasuna marrazteko, zenbaki absolutuak baino deigarriagoak izan daitezke hori dena beste Auzoetako portzentaiez argitzea. Obrero ez koalifikatutan Altza zen ehuneko altuena zuena (% 10,80), eta Amara Berria baxuena (% 3,90). Egia bere % 7,14arekin Loiola-Martuteneren azpitik dago (% 8,56), baina Gros-en gainetik (% 4,92), eta multzo honetan Antigua dago Egiaren pare-parean.

Egiako obrero berezituek (% 15) bikoiztu egiten zuten peoi/obrero ez berezituen kopurua, eta kopuru bertsua zen dendari/funtzionarien portzentaia: azken multzo honetan erdi-goi mailara igo nahiez zebilen orduan Egia (%15,16). Profesiodun eta goi-funtzionaritan, ostera, ahula ageri da Auzoa (% 2,07), eta Hiriko etorkin-langileen Auzoak ditu bakarrik azpitik, Gros-ek berak bikoiztu egiten baitzuen ia (% 4,03) multzo horretako Egiaren portzentaia[25].

### *2.2. Zenbait zerbitzuren askitasun-maila*

Egiatarrak, pertsonalki eta familian, honela ikusi ondoren, Herri eta Auzoa beren gizarte-nortasunean eta elkarbizitzan moldatzen duten lagunarte, zerbitzu eta harremanetatik begiratu beharko genuke, horiek mamitzen baitute (besteak beste), gizabanakoen borondate eta izaerarekin batera, Auzoa nahiz Herria.

Zoritxarrez, Egia Auzoko elkarte edo zerbitzu-molde guztien historia egiterik ez dugu hemen; urrunegi joango ginateke, azterlan honetan ditugun asmoetan, baina komentu nahiz parrokia baten bizitza eta berorietako zuzenespena batez ere eskain dezaketen zerbitzuan dagoenez, esan dezagun zertxobait Auzoko zerbitzuen sareaz, alde horretatik ere Auzoko testuingurua ezagut dezagun.

Hiriko historialariek bezala soziologo edo hiri-geografoek aurkeztu izan dituzte Donostiako Auzo bakoitzak dituen zerbitzu-sareen ezaugarriak. Izan ere, ez dira Auzoak berdinak, eta horietako bakoitzak bere autoaskitasun erlatiboa du, eta ingurutik/ingurura gisa ezberdinetan hartzen/ematen dituzte zerbitzuak.

---

25. Urbanistes Associats 1978b: 88 ("Actividad laboral de la población" taula).

### *2.2.1. Merkataritzako azpi-sektoreak (1975)*

Hori horrela, osotasun asmorik gabe, bi grafikoren bidez adieraziko dugu, zerbitzuekiko Egiaren ezaugarriak eta nortasuna nolakoak ziren, 1975aren inguruan. Erdialdeko eta Gros Auzoko adibideez baliatuko gara, Egiarena azpimarratuago uzteko.

Zerbitzuen sektorearekin gabiltza, baina ez dezagun ahantz ondoko grafikoetan merkatal zerbitzuak direla bakarrik gogoan hartzen ditugunak; eta hezkuntz edo eliz zerbitzuak, esaterako, ondoko euskarazko kapituluan eta erdarazko liburuan ikusiko ditugula.

Ondoko orrialdeko grafikoen bidez, hiru alde nagusi azpimarratu nahi dira:

1) Auzo bakoitzak Hiriko biztanlegoaren barnean duen portzentaia erlatiboa (kanpoko zirkulu handiaren bidez adierazita dago).

2) Auzo bakoitzak Hiriko zerbitzuetan duen pisu erlatiboa (barneko zirkuluaren tamainaren bidez adierazita dago).

2) Auzo bakoitzean, zerbitzuetako azpi-sektoreek beren artean duten portzentaia erlatiboa (eta bertako populazioarekiko askitasuna)

Ikus daitekeenez, biztanleria handi bateko Auzoak badaiteke, hala ere, zerbitzutan portzentaia txikiko ehunekoa izatea Hirian: hori da Erdialdearekin gertatzen dena, hemen gogoan ditugun merkatal zerbitzuetan (handia kanpoko zirkulua, baina txikia barnekoa). Horrela, Erdialde hori Grosekin alderatuz gero, azken hau erlatiboki askoz emankorragoa ageri zaigu bere zerbitzuetan (barneko zirkulua handiagoa du Grosek, Erdialdeak baino).

Egiako zirkuluari dagozkionetan esan dezagun: a) Egiak Hiri osoarekin alderatuz bizilagun gutxi zituen (kanpoko zirkulua erlatiboki txikia), baina b) Erdialdeak ematen zituen merkatal-zerbitzu bertsuak eskaintzen zituen Gros-ek, denda-kopurutan eta.

Auzoetako merkatal azpi-sektoreetara gatozela (grafikoetan lauki zenbakiztatuz adieraziak), Auzo barnean horietako bakoitzak duen leku erlatiboa oso bestelakoa izan daiteke Auzotik Auzora. Ikus, adibidez, 1. azpi-sektorea (elikadura): Egian du leku erlatiborik handiena, Grosen gero, eta Erdialdean txikiena; ezaguna da, Groseko 7. azpi-sektoreak (ibilgailuenak) aspaldidanik izan duen munta, baina askoz urrunago datoz Egia eta, zer esanik ez, Erdialdea; hemen, ostera, nabaria da ehun-dendariek duten pisua, 2. azpi-sektorean alegia, Egia eta Gros atzerago dauden bitartean.

Ez gara luzatuko xehetasun gehiagotan, zeren irakurleak aurrean du grafikoa, bere gogoetarako[26]:

**Egia, Erdialde, Gros:**

EGIAKO MERKATAL ZERBITZUETAKO AZPI-SEKTOREAK




1. Elikadura.
2. Ehunak.
3. Banketxeak.
4. Erloju-Optika-Argazkigintza.
5. Farmazia.
6. Liburudendak-Paperdendak.
7. Ibilgailuak.
8. Etxe-hornikuntza.
9. Burdindendak-Aroztegiak.
10. Zerbitzu pertsonalak.

Iturria: Gómez Piñeiro: III, 155

---

26. GÓMEZ PIÑEIRO 1982: 155.

**Egia, Erdialde, Gros 1975:**

EGIAKO MERKATAL ZERBITZUEN AZKITASUN ERLATIBOA







Iturria: Gómez Piñeiro: III, 155

### *2.2.2. Egiako autoaskitasuna (1975)*

Merkatal zerbitzu-sistema honi esker, Egia aski horniturik zegoen, merkatal erantzunean bezala finantzarioan, eta azpi-sektoreren batean Auzotik kanpo bere eskaintza egiteko moduan, nahiz eta eskaintza horretan Gros, adibidez, askoz garatuagoa ageri zen Hiri osoan (baina kasu honen parekorik apenas zegoen besterik, Alde Zaharra eta Erdialdea kenduta).

Une hartako Egiaren kasua, bere zerbitzuetan, askitasun itxuroso batena zela ikusten dugu, nahiz eta merkatal zerbitzuen horrek ez duen esan nahi grafikoak jaso ez dituenetan askitasun bera zegoenik[27]. Horrela, eguneroko osasun-zerbitzutan, edo bertako haurren edozein mailatan ere eskolatzean, bestelakoa, eta arras bestelakoa ere, izan zitekeen Auzoko egoera.

Auzoko ekonomiaren parte garrantzitsu honek (denda-merkataritzak, batez ere) Egian zuen joanetorria ezagutzeko ondoko grafiko hauetaz balia gaitezke (grafikoa 93 orrialdean).

Grafiko hauetan ere, zirkuluaren tamainak Hiri barruko biztanlego erlatiboa adierazten du, eta datu orokor koantitatibo horren ondoren, Auzo bakoitzari legozkiokeen azpi-sektoreetako garapenak ematen dira: hauek, batzuetan, ez dira iristen Auzoko zerbitzu-eskeari erantzutera, eta bestetan, Auzoko biztanlegoaren mugak gainditu eta inguruetara hedatzen dira beren zerbitzuak ematean.

Ikuspuntu horretatik, kasuak elkarrekin alderatzeko asmoarekin hautatu ditugu hemen aurkezten ditugunak. Sei dira hauek, eta elkarren antzeko bina kasu dakartzagu hona: a) Auzo-mugak hausten dituzten bi kasu: Erdialdea eta Gros; b) Beren autoaskitasunean guztiz eskas geratzen direnak (Loiola-Astigarragako bide-ingurua eta Altza); eta c) Auzoko zerbitzuak hor nonbait betetzen dituztenak (Egia eta Amara).

Nabaria da Egia eta Amararen arteko antza, merkatal eta finantz zerbitzuen alde horretatik, eta berauen askitasunari dagokionean. Bizkanlez Amara da handiena, baina Auzoko askitasunaren osoan eta orekan hurbil daude bi Auzook: elikaduran eta merkataritza lagungarrian, eta hurbil dira grafikoko beste hiru parametroetan ere.

Erdialde eta Gros-eko kasuek, aitzitik, mutur-alde bateko aurpegikera dute, populazioei legokiekeenetik askoz harago doazelako, grafikoko bi baliotan, eta betiere, adar guztietan Auzoko premiak osorik asetzen dituztelako. Hain zuzen, hauxe da ondoko kasuaren kontrakoa.

Altzan bezala Loiola-Astigarraga ardatzeko Auzoetan nabaria da biztanleriarekiko zerbitzu hauetako erantzun-ahalmen eskasa. Altzak, elikaduran,

---

27. GÓMEZ PIÑEIRO 1982: 231.

edaritegi-jatetxetan eta merkataritza orokorrean ongi erantzun dezake, baina oso motz geratzen zaie biztanleei bertako zerbitzu-eskaintza beste hiru alorretan. Loiola-Astigarragaren egoera erreparagarriagoa da oraindik: bi adar ditu bakarrik aski dituenak (baina horietako bat bakarrik ehuneko ehunean erantzun dezakeena), eta lau ditu askitasunean % 25etik gora ez doazenak. Zerbitzu hauetan, ba, auzune hau arrunt desegituratua ageri zaigu.

Merkatal prestutasun hauen ikuspuntutik (beti ere ikuspuntu mugatua berau), Egiako Auzoa aski autarkikoa izango litzateke, Erdialdea eta Gros beren baitarako aski izanik, inorentzat ere lanean diharduten bitartean; eta Loiola-Astigarraga eta Altza desorekatuak eta partez zinez ez-askiak diren bitartean.

## 3. Egiako Auzoa 1996an

1975eko urte hartatik hona, hogei urte luze eta aldakorrak pasatu dira. Bitartean, Egiako bizilagunek harat-honat urduriak bizi izan dituzte: auzolagunak joan dira, auzolagun berriak etorri; biztanlegoa nabarmenki murriztu da, Auzoko hiritartzea areagotu; Egiako malda zaharra etxez bete da, orduan hutsarteak zeudenetan ere; Polloe-inguruan auzogune berriak ditugu, eraikin-modu berriekin. Konkorrene zaharra kultur eta eliz jardueraz bete da, Jareño Kultur Etxea abian da. Atotxa gazte-zahartuan, bere diamantezko ezteiak betetzean, Futbol-Zelaiak ez du garai bateko oihartzunik…

Egia-Atotxa bere baitara bildu dela esango litzateke, baina auzotasun harmoniatsu baten bila, eta, bestalde, 1995eko Plan Orokorrak Hiri-Erdialdera eramango du. Hala ere, Auzoko aldakuntza berriak bere baitatik gidatu beharko lituzke Egiak, batez ere bere barne-bizitzan eta, zergatik ez, baita Auzoz kanporako harremanetan ere. Protagonistak Egia bertakoak izan daitezke, bertako bizilagunak. Hain zuzen, hauetaz hitz egin nahi dugu ondoren.

### *3.1. Egiako bizilagunak (1996)*

Ikusi dugu jada, azken bi hamarkadetan Egiak bere biztanle-aldakuntzak nolako munta izan duen: 1975eko 20.082 lagun haiek, 1996an 13.291 izatera etorri dira. Aldaketa koantitatibo txundigarria izateaz gain, uste daiteke zerbait koalitatiborik ere aldatu dela Egiako Auzoan, jendearen bizimoduan, baliabide ekonomikoetan, pentsamoldetan, erlijiotasunean, etab.[28].

---

28. Ik. 1996ko Erroldan jaso den definizioa: Barrio de Egia-Tolaregoia = Secciones 7, 10, 11, 12, 13, 15, 16, 17, 18, 19 del Distrito 4 [4. Distrito-ko besteak Gros-era eta Loiolara doaz]. Ik. *Estadísticas del Padrón a 1-5-1996*: “Definiciones”.

### *3.1.1. Biztanleriaz, oro har*

Ikusi dugu, bizilagunen kopuruak pausuz pausu behera egin duela Egian 1996ko Errolda arte bederen, kasik 1950ko tamainara etorriz. Azken Udal Erroldak, ba, 13.291 laguneko Auzoa erakutsi du Egian. Hiriko % 11,7 zen Egiako biztanleria 1975ean; 1996an, % 7,5 izatera etorri da, eta portzentaia honekin, Antiguaren zerbait gainetik eta Erdialdearen paretsuan dago. Bizilagunen kopuru absolutuz, Egia aipatutako bi Auzo horien paretsuan dago, Amara Berria, Gros edo Altza askoz goragotik dabiltzan bitartean (20.000tik gora denak ere)[29].

1975eko Erroldak, eta 1996koak ("Egia-Tolaregoia" bezala definitu duen barruti honetan), azken hogei urteetako bilakaera demografikoa honela zenbatu dute:

EGIAKO BIZTANLERIAREN BILAKAERA (1975-1996)[30]

| *Urtea* | *Biztanleak* | *Galera-kop.* | *Galera: %* |
|---|---|---|---|
| 1975 | 20.082 | — | [100: basetzat] |
| 1981 | 16.194 | –3.888 | % 19 |
| 1986 | 15.471 | –4.611 | % 23 |
| 1991 | 13.892 | –6.190 | % 31 |
| 1996 | 13.291 | –6.791 | % 34 |

Elkarren jarraiko galera-kopuru horiek, eta galera-portzentaiak ere (%), metatuta eman ditugu, eta portzentaietarako basetzat, 1975eko biztanleria hartu dugu.

Zifra horiek azaltzen digutenez, galera-une larri-larria 1975-1981.etakoa izan zen (% 19), eta gero, 1991 artekoak berretsi egin zuen aurreko urte haietakoa, portzentaia metatua % 31raino eramanez. Dena den, 1991-1996.etan mantsotu egin da galera-abiadura bizkor hura.

### *3.1.2. Donostiarrak eta etorkinak (1996)*

Arestian, 1975ekoaz jardutean, eman zaio begiratu bat Auzoko bizilagunetan jaiotzezko sorterriak zuen lekuari. Handik honako urteetan zein aldaketa izan ote du horrek Egian, 1996raino? Berdina edo oso antzekoa ote da orduko egoera eta gaurkoa?

---

29. Urbanistes Associats 1978b: 75, 80; *1996ko Udal Errolda*: "Población por Barrio".
30. *1996ko Udal Errolda*: "Evolución en el tiempo de la población por barrios".

HIRIKO ETA ZENBAIT AUZOTAKO BIZTANLERIAREN SORLEKUAK (1996)[31]

| *Jaiotzez* | *Donostia* | | *Egia* | | *Gros* | | *Altza* | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| | *Bizilag.* | *%* | *Bizilag.* | *%* | *Bizilag.* | *%* | *Bizilag.* | *%* |
| Donostiarrak | 103.767 | 59 | 7.703 | 58 | 12.136 | 59 | 11.605 | 55 |
| Euskal herritarrak | 35.687 | 20 | 2.488 | 19 | 4.680 | 23 | 2.238 | 10 |
| Kanpotarrak | 37.454 | 21 | 3.100 | 23 | 3.578 | 18 | 7.395 | 35 |
| **Orotara** | **176.908** | **100** | **13.291** | **100** | **20.394** | **100** | **21.238** | **100** |

Donostiartasunean, Hiriko eta Gros-eko portzentaiatik bertantxe zegoen Egia, bere % 58arekin (ez da ahantzi behar hamar puntutan gora egin zuela, 1975etik aurrera), eta Altza baino dezente gorago. Horien ondoan, Hiriko Auzo donostiarrenak Igeldo (% 70), Añorga eta Alde Zaharra (67) ziren.

Hiriak oro har, eta Auzoek, dituzten euskal herritarren etorkin-kopuruak, eta beroriek Auzo bata ala bestea bizilekutarako aukeratzean, berriz ere Hiriko eta Groseko portzentaien artean geratzen zaigu Egia, eta, bistan da, Altzan etorkin euskal herritarrek presentzia erlatibo apalagoa dutela (% 10 bakarrik), nahiz eta kopuru absolutuz Egia eta Altza berdindu samarturik ageri diren (2.488 euskal herritar hark, 2.238 honek).

Kanpotarretan dagoena, beste aurreko datu horien ildo osagarrian dator, noski. Altza da, espero zitekeenez, hautatu ditugun Auzoetan erbestetarrena, bere % 35 portzentaia horrekin, eta kopuru absolutuz ere alde handia ateratzen die Egia eta Grosi, eta Hiriko kanpotarren batezbestekoaren (21) oso gainetik geratzen da Altza. Egia ere batezbesteko orokorraren gainetik dago, baina bertatik nahikoa hurbil (23). Egiako kanpotarretako (3.100 biztanle) 2.909 Estatu Espainoletik etorriak dira, eta 191 bakarrik bestelako erbestetakoak.

Donostiarrak eta euskal herritarrak batera eman nahi baldin badira, Donostian % 79 dira Euskal Herrian jaioak, eta %21 kanpotik etorriak, betiere 1996ko urtean. Euskaltasun bertsua dute Grosek (% 82: portzentaia orokorraren gainetik, hortaz) eta Egiak (77). Gros-ek erakarmen aski bortitza izan du, nonbait, euskal herritarrentzat, eta hauetako kopuru ona dugu bizitzen Auzo horretan: 4.680 lagun. Altza, ostera, aski urrun dago bere ehunekoarekin: % 66 jaiotzezko euskal herritar.

Hiri osoari begira, euskal herritar ez-donostiar gehien edo berorien portzentaia altuenak bildu dituzten Auzoak ondoko hauek dira, 1996ko Erroldaren arabera[32]:

———

31. Portzentaiak Auzoko biztanle-kopuruaren gain. Erroldako datuen gain geuk landua.
32. Portzentaiak, Auzoko biztanle-kopuruaren gain. Erroldako datuen gain geuk landua.

EUSKAL HERRITAR EZ-DONOSTIARRAK AUZOZ AUZO (1996)

| *Auzoa* | *Eusk.herrit.* | *Portzentaia* |
|---|---|---|
| Egia | 2.488 | % 19 |
| Alde Zaharra | 1.425 | % 22 |
| Erdialdea | 3.457 | % 25 |
| Mirakontxa | 970 | % 32 |
| Amara Berria | 6.408 | % 24 |
| Antigua | 3.117 | % 24 |

Egiara biltzen garela, bertan bizilekua duten euskal herritarrak honela banatzen ziren 1996an: 2.488 horietako 344 Donostialdekoak ziren; 962, gipuzkoarrak; 146, arabarrak; 805, nafarrak; 231 bizkaitarrak (Iparraldekoen albisterik ez da ageri Erroldan). Auzotarren sorterrien arabera, hori da, ba, Egiak gaur egun duen aurpegia.

Datu orokor hauek zerbait osatzeko eta bestelako xehetasunetan berriro sartu gabe, eman dezagun azkenik albisteren bat Auzoak 1996an zuen eskolatze-mailaz.

### *3.1.3. Eskolatze-mailak*

Donostiak inolako hizkuntzatan alfabetatugabeko 1.417 herritar zituen (ez naiz ari, noski, euskaraz alfabetatugabekoei buruz): 967 emakumezko eta 540 gizonezko. Alfabetatugabeetako 904, berrogeita hamar urtetik gorakoa da (% 64), eta horietako 664 emakumezkoak dira, eta 240 gizonezkoak[33]. Donostiako % 0,8 zen, ba, Hiriko alfabetatugabeen portzentaia.

Hala ere beharrezkoa da bigarren talde bat ere gogoan hartzea, eskolatugabeena (“sin estudios”, dio Erroldak), egotez eta eskolamenduz, aurreko taldearen ondo-ondoan egon baitaitezke. Bigarren talde hau aski zabalagoa da: 7.080. Hemen ere emakumezkoak arrunt gehiago dira, 4.615, eta gizonezkoak, ostera, 2.465.

Alfabetatugabeen eta eskolatugabeen eremutik eskolatuenetara gatozela, interesgarria da donostiarren eskolatze-mailak nola banatzen diren

---

33. *1996ko Udal Errolda*: “Población por grupo de edad, título y sexo: varón, mujer”. Eskolatze-mailaren honetan ez dira kontatzen 0-9 urte tartekoak, baina portzentaiak ematean biztanlego osoaren gain emanak daude ehuneko horiek

ezagutzea, eta ondorengo laukian bildu ditugu datu horiek, 1996ko Erroldaren arabera[34]:

DONOSTIAKO ESKOLATUEN IKASKETA-MAILAK (1996)

| *Eskolatze-maila* | *Emakumezkoak* | *Gizonezkoak* | *Orotara* | *%* |
|---|---|---|---|---|
| Lehen Ikasketak | 37.455 | 28.897 | 66.352 | 37,5 |
| Lanbide-Heziketa | 9.265 | 10.528 | 19.793 | 11,2 |
| Bigarren Maila | 15.820 | 14.593 | 30.413 | 17,2 |
| Ikasketa Ertainak | 7.272 | 4.491 | 11.763 | 6,6 |
| Goi-Ikasketak | 7.701 | 9.972 | 17.673 | 10,0 |

Laukia aski esanahitsua da. Donostiak emakumezko bizilagun gehiago zituen (93.917), gizonezkoak baino (82.991); datu hori ere gogoan hartzekoa da, estatistika hauek begiratzean. Oro har, ikusten da biztanleetako gehiengo handi bat Lehen Ikasketetara mugatu dela, eta maila horretan alde nabaria hartzen diete emakumezkoek gizonei.

Hurrengo bi ikasketa-motetan (Lanbide-Heziketa eta Bigarren Mailan) nahikoa parekaturik ageri dira kopuru absolutuetan gizon-emakumezkoak, eta neskek hartzen dute aurrea Hezkuntza Ertainetan, nabariki (pentsa daiteke nexken irtenbide profesional nagusiena idatz-administrariena delako, eta horretara mugatzen direlako); baina horrek ez dakar hurrengo mailara pasatzean ere berdin gertatuko denik, izan ere gizonezkoak baitira alde handiarekin Goi-Ikasketetan nagusi: Unibertsitatera Donostiako 7.701 neska iritsi den bitartean, 9.972 dira Goi-Ikasketak egin dituzten mutilak. Horra, ba, Donostiako datuak.

Eta zein da, testuinguru horretan, Egiako biztanlegoaren egoera? Ondoko laukian bildu ditugu hezkuntzari dagokion honetan argiren bat eman dezaketen Egiako eta beste zenbait Auzotako portzentaiak. Goian Donostiaz eman ditugu portzentaiak, eta haiek ondoko hauekin aldera ditzakegun bezala, aukera dugu orain Egia beste horiekin guztiekin ere konparatzeko[35]:

---

34. Ibidem. Portzentaiak Hiriko biztanlego osoaren gain ematen dira, eta laukiko datuek ez dute % 100-a osatzen, alfabetatugabeak, ikasketarik gabeak eta sailkatzeke geratuak ez baitira ageri laukian.

35. Iturria beti bezala *1996ko Udal Errolda* da: “Población por grupo de edad, título y barrio”. Portzentaien taula (Auzoko biztanleria osoaren gain emana) Errolda horretatik geuk landu dugu. “Bestelakoak” kontzeptua jarri dugu *alfabetatugabeak* + *ikasketagabeak* + *Erroldak sailkatu gabeak,* denak batera adierazteko.

AUZOETAKO ESKOLATUEN IKASKETA-MAILEN PORTZENTAIAK (%) (1996)

| *Eskolatze-maila* | *Erdialdea* | *Egia* | *Gros* | *Altza* |
|---|---|---|---|---|
| Lehen Ikasketak | 31,5 | 45,5 | 33,7 | 51,7 |
| Lanbide-Heziketa | 9,0 | 13,3 | 10,6 | 12,5 |
| Bigarren Maila | 20,9 | 15,2 | 19,6 | 9,8 |
| Ikasketa Ertainak | 8,7 | 5,3 | 7,8 | 2,3 |
| Goi-Ikasketak | 17,3 | 6,2 | 12,0 | 2,0 |
| *Bestelakoak* | *16,2* | *16,5* | *16,3* | *21,6* |
| **Biztanleak** | **13.657** | **13.291** | **20.394** | **21.238** |

Zein da, ba, Egiako egoera bizilagunen hezkuntz eremu honetan? Hasteko, esan dezagun zutabe bakoitzeko portzentaiek ematen digutela Auzo bakoitzeko biztanlegoaren hezkuntz soslaia: Erdialdea da profilik "jasoena" duena. Portzentaiarik baxuena berak du Lehen Ikasketetara mugatzen direnen kopuruan (% 31,5), eta, Lanbide-Heziketan salbu (ez ahantzi beste ezer baino lehen hezibide alternatiboa izan dela sarritan, gorantzako hurrengo pausua baino areago), hurrengo maila guztietan Erdialdeak erakusten ditu ehuneko altuenak, Bigarren mailan noski (%20,9), eta zer esanik ez Goi-Ikasketetan, alde handiarekin gainera (% 17,3).

Gros da, hemen, Erdialdearen ondoren hezkuntz soslaian hurrengo aurpegirik landuena, eta Donostiako portzentaietara nahikoa hurbiltzen zaiguna (begira aurreko laukian). Hau da, bere aldetxoekin izanik ere, Grosek aski gertutik ispilatzen du Donostiak oro har duen hezkuntz maila.

Egia, horren zerbait atzetik geratzen da 1996ko Errolda honetan; baina Altzarekin alderatzen baldin badugu, aldeak deigarriak dira, benetan. Ehuneko 45 egiatar Lehen Ikasketetara mugatu da (portzentaia altuegia aurreramendu sozialerako); Lanbide-Heziketan Altzaren zerbait aurretik ageri da Egia, baina batez ere azpimarratzekoa da Altzari alde ona daramakiola Bigarren Mailan, nahiz eta gero, Ikasketa Ertainetan, Grosek portzentaia doblatu egiten dion: Egiak 6,2, Grosek 12.

Altza da lauki honetan, beste Auzoei kontrajarrita muturreko soslaia erakusten diguna. Hasteko, biztanleriaren erdiak baino gehiagok ez du lehen Ikasketetatik aurrera egin. Muga latza da hori, batik bat halako tamainan izanik (% 51); oraindik Lanbide-Heziketari hor nonbait eutsi dio Altzak (uste dugunez, emakumezkoen nola-halako lanbide-heziketari esker), baina hortik gorako guztia goitik behera dator Auzo horretan, Auzoak dituen premiak haragi-gorritan utziz: Bigarren Mailatik (% 9,8,), Ertainetara (% 2,3) eta Goi-Ikasketetaraino (% 2). Urrun geratzen da hori Egiakotik bertatik ere.

Testuinguru horretan dago, beraz, Egiako bizilagunen hezkuntz maila, erdi-mailatik gorantz abiaturik dagoena: prestakuntza profesional eta arrakasta sozialerako erosotasun handirik gabe, baina premia orokor larrienetik irtenda. Giza prestakuntza arretaz zaindu eta lagunduz gero, laster batean Hirian leku on bat izateko bidean da Egia.

Honaino iristean, gure kultur munduarekin zerikusirik duen beste alde bat ukitu nahi dugu. Biztanlegoaren sorlekuak gogorarazi ditugu, eta oraintxe, Auzoko hezkuntz maila: zer esan, ordea, Egiak duen euskaltasunaz? Ondoko atalburu batean aztertuko da hori; orain, lehenik eta horren aurretik, deskribatu dugun Egiako gizartea elkarte eta erakundeetan nola bildu den azaldu nahi dugu.

## Laugarren Partea

### Egia-ko erakunde, elkarte eta taldeak
### Instituciones, asociaciones y grupos sociales de Egia

Instituciones de diverso carácter, religioso o civil, han encauzado la vida del Barrio, y el asociacionismo social ha sido generoso en promover y guiar iniciativas de toda índole en Egia. Aunque las limitaciones lógicas del estudio no permitan un análisis pormenorizado de esa doble realidad, institucional y asociativa, en esta cuarta parte se hace un balance de su desarrollo y dimensión actual.

Tratando de dar un alcance más generalizado a la historia del Convento franciscano de Atotxa, se ofrecen, primero, los datos de cómo se fue configurando el rostro parroquial del Barrio estudiado, a partir de la Parroquia de San Ignacio (en el Gros: 1897), siguiendo por la iglesia franciscana de San Francisco (inauguración: 1926) y su erección en Parroquia (1965), hasta desembocar en el conjunto actual de Parroquias.

En segundo lugar, se presenta también un cuatro que sintetiza el crecimiento y posterior reducción que han vivido los Institutos Religiosos (Ordenes y Congregaciones) en Egia durante el siglo XX. El cuadro, que quiere ser exhaustivo, resume dicha historia en su sucesión cronológica, su ubicación en el Barrio y con la definición de sus tareas. Todo ello tiene el interés de ser un acontecer reciente, pero en vías de clara reducción (o extinción).

En un proceso inverso al vivido por los Institutos Religiosos, las asociaciones cívicas del Barrio han conocido su auge en los últimos treinta años. Son las llamadas "Asociaciones de Barrio" que han respondido a iniciativas de diverso origen (religioso, partidario, social, deportivo, etc.), y que evidencian una efervescencia social significativa. Se han contabilizado hasta 63 asociaciones en octubre de 1999, clasificados por nosotros en 11 grupos de interés o actividades (información, familia, juventud, tercera edad, cultura, fiestas, deporte, etc.).

Se ha confeccionado una breve base de datos, referida a estas asociaciones, con la fecha de su nacimiento de cada una y una sumaria nota sobre las actividades desarrolladas por las mismas.

* * *

Gizartea, herria, auzoa ez dira gizabanakoak elkarren gain metatuta besterik gabe egiten, hurbiltasun fisikoaz beste, horretarako herritar guztien arteko bizi-loturak ere eratu egin behar dira.

Gizarteko bizitza ezinezkoa da giza-lagunen elkartasunik gabe, gisa batean nahiz bestean ohitura, arau, kidetasun eta mota guztietako harremanik gabe. Gizarte hori "herri" bezala definitzean, areagokoa da oraindik herritarren arteko elkar-bizitza hori, izan ere taldeko kidetasun sozial eta kulturalak baitira herri horri barne-batasuna ematen diotenak.

Gizarte nahiz herriko barne-lotze horretan, besteak beste, herritarren arteko elkarteek funtsezko zeregina izan ohi dute. Eman dezagun, inoiz gertatu izan den bezala, herri oso bat ezerezetik jaso dela bat-batean, bizilagunak nonahitik ekarri eta elkarren ondoan bizitzen jarriz: auzo edo herri horrek ez du hastapenean denen arteko herri-nortasunik, harik eta ezaupide eta egunerokotasunaren ondorioz eta denbora baten buruan denen arteko elkar-bizitza ongi lotua mamitzen ez den bitartean.

Egia Auzoa da antzeko kasu bat: jatorrizko biztanleei bere garaian etorkinak gehitu zitzaizkien, bakoitza bere historia pertsonal eta ohiturekin, baina denbora eta astia behar izan dira guztien arteko elkartasuna eta bizikidetza harmoniatsuagoa eta dinamikoa sortu ahal izateko.

Gaur egun, Egiako elkarte eta lagunarteen bizitasuna Auzoaren nortasun-ezaugarrietako bat da. Baina ez da beti horrela izan, eta esan daiteke batez ere azken hiru hamarkadetako gertakaria dela elkarteen garapen hori. Lehenago, Elizaren inguruan biltzen zen hainbat elkarte erabakigarri izan ohi zen elkar-sozialtasun horren aitzindari.

*Un Convento en la ciudad* dentzan liburuan ikus daiteke, adibidez, zein leku izan zuten hori dena hezur-mamitzen frantziskotarretako elkarte erlijiosoek. Arrazoi orokor haiengatik eta Auzoan bertan gertatu dena aintzakotzat harturik, eta egiatarrentzako oroigarri bezala, bertako Elkarte eta Parrokiez esan nahi dugu zerbait euskarazko azken parte honetan, Auzoaren nortasun-agergarriak baitira guztiok ere.

* * *

## 1. Donostiako Parroki antolamendua

Hiriaz ditugun lehen albisteetatik bertatik ageri zaigu Donostia, herri bezala, eliz antolamenduari lotuta, izan ere Leireko Monasterioari eginiko dohaintza baten agiria da Donostiaz ari den iturririk zaharrenetako bat, ustez edo esatez 1014koa omen dena baina XII. hondarretan idatzitakotzat eman daitekeena[1].

Bestalde, Donostiako iraganaz ari izan den historiografiak ezin izan du bazterrera utzi, murruz barneko eta inguruetako baserrialde irekiko eliz antolamendua, berorietako ermita, kapera, monasterio nahiz komentu eta parrokiak aipatuz. Eliz historiarekiko ardura hori ageri da historialarietan, Gipuzkoako eta Hiriko eliz historiaz dihardutenen lanetan, noski, baina baita iragan zibil orokorraz arduratu direnengan ere.

Zorionez, artxibo erre eta paper galduak gorabehera, Parrokien historia ezagutzeko, betidaniko ohiko agiritegietan ez ezik (Iruñeko Elizbarrutiko Artxiboa, e. b.), bada Donostiako erakundeetan bertan ere iturri bilagarririk, hemengo historia horretaz jabetzeko. Hori da, adibidez, San Bartolome Monasterioaren kasua, jada XIII. mendetik hasita[2].

Hau guztia gogoan dugula, goazen, hortaz, gure Hiriburuak izan dituen eliz antolamenduei buruz zertxobait ezagutzera.

### *1.1. Betidaniko eliz antolamendu donostiarra*

XI. mendetik hasita, behin eta berriz Iruñeko Elizbarrutiaren mugak zehaztu nahirik emandako agirietan azaltzen da aipatuta Donostia; hau da, Diozesi horren barnean ageri zaigu gure Hiria, eta ondoko mendeetako iturriek ez dute berretsi baizik egingo albiste hori[3]. Gipuzkoa gehienean bezala Donostian ere, Nafarroako Gotzaindegia zen hemengo eliz Burua.

Historialari donostiarretan klasikoena dugun Camino-k bere liburuan atalburu bana eskaini zizkien hiriko parrokia, monasterio eta komen-

---

1. Hain zuzen, agiri hori Leireko monasterioaren ikuspuntutik berraztertzea proposatu da berrikitan, Donostian bertako interes edo egokieratik baino areago: FORTUN PEREZ DE CIRIZA, L.J. (1982): “San Sebastián en el dominio del Monasterio de Leire (siglo XI-1235)”, in: *Donostiaren fundazioaren VIII. Mendeurrena. Kongresua: 1981eko urtarrilaren 19tik 23ra*. Donostia: Eusko Ikaskuntza. 51-67. Bestalde, ik. MARTINEZ DIEZ, G. (1975): *Guipúzcoa en los albores de su historia*. San Sebastián: Diputación Provincial. 28-32.

2. MAISTERRENA, A.; VIVES, G.; AGUINAGALDE, B.; ROLDAN, J. M. (1982): “Documentación del siglo XIII del Monasterio de San Bartolomé del Camino de San Sebastián”, in: *VIII. Mendeurrena. Kongresua*: 499-508.

3. OSTOLAZA, I. (1982): “La organización eclesiástica guipuzcoana durante la Edad Media”, in: *VIII. Mendeurrena. Kongresua*: 163-172.

tuei[4]. Idazleak hiru Parrokia eman zituen hirikotzat: Santa Mariako ama-eliza, San Bizente eta Antiguako San Sebastián[5]. Madoz-ek (1845) bezala Gorosabel-ek (1862) Parrokia berak aipatuko zizkiguten, eta honek gogoratzen digunez, Donostiako hauek Herriaren Zaingoa zuten, eta ez zeuden ez Errege, ez besteren menpe, hirurok Bikario bat eta 11na benefiziaturekin[6].

Irigoien Gotzainak 1777an ezarritako erreformaren arabera, murruz kanpoko auzoei, behar zuten arretaz erantzun behar zitzaien, eta horretarako, Bikario-barruti berriak sortu zituen Antzietan (Amara/Loiola), Lugaritz eta Ibaetan[7]. Dena den, Egia San Bizenteren ardurape zuzenean jarraiki zen.

Baserritarrek beren ohiko elizkizunak auzoko ermita edo elizatxoan izaten zituzten, eta une jakin eta jai nagusietan zuten Parrokiara bertaraino joateko betebeharra. Bataioak, ezkontzak edo hiletak Parrokian zuten berariazko lekua, eta Pazkoazkoak ere hantxe bete behar ziren. Hamarrenak, hasikinak eta limosnak ere Parrokiara biltzen ziren[8].

Parrokien inguruetan ermitak eta komentuak ere bazeuden, eta Egia zen horietaz baliatzen zirenetako bat, bere Sta. Magdalena ermita eta frantziskotarren Txurrutaleko komentuak bertan baitzituen.

Hiriko aldakuntzekin batera, hori dena aldatzen hasiko da XIX.aren bigarren erdialdian. Gasteizko Elizbarrutia sortu eta berehala, Diozesi osorako plangintzak asmatzen hasiko da berori: beharrezko eraketa berri bat nahi zen Parrokietarako ere. Insausti-k utzi digun azterlanean ikus daiteke egoera (bizilagunak, benefiziatuak, hauen soldatak, agian komenigarri izan zitezkeen parrokia berriak); dena den, 1863ko lehenengo plangintza hura (Donostiarako Parrokia berririk proposatzen ez zuena) asmotan geratu zen.

Murruak hautsi eta hedagune berriak aurrera egin ahala sentitu zen parroki antolaerari zinezko berritu on bat eman beharra.

---

4. CAMINO 1963: XXVIII, XXXII eta XXXIII. atalburuak. (161, 188, 200. or.). Ik. Inzagaray 1951: 85-101.

5. CAMINO 1963: 173, 175, 182.

6. MADOZ 1845: 307-309; Gorosabel 1899-1901: 415, 420-421.

7. CAMINO 1963: 181.

8. JIMENO JURIO, J. M. (1998): “Iglesias y euskera en Donostia (siglo XVI)”, in: *Vasconia*. 1998, 224. Idazlan berean ikus daiteke Donostiako eliz antolamenduaren azalpen eguneratu bat.

### *1.2. 1881-1883.etako parroki erreformak*

Donostiako hirigune nagusia harresietatik irten eta hogei urte baino lehen, Egiako lurretan ere eliz berrikuntza instituzionalak etorri ziren. Hain zuzen, Gros-en, hau da, betidaniko Egiako barrutian, San Ignazioko Parrokia sortu zen.

#### *1.2.1. Egia-Gros-eko hiriztapena (1840-1921)*

Gros-eko padura eta dunetan hiriztapena hasi orduko pentsatu zen Auzo berrian elizaren bat ere behar zela[9]. Artean, etxegintza oso erdizka eginda zegoela zen hori: etxeren bat edo beste, lantegi koskorren bat, biltegi eta horrelakoak zeuden Gros-en, gehiagorik ez. Gros-eko hiriztapen plangintza bera ere artean onartu gabe zegoen (ikusi dugu 1894an izan zuela Udalaren onarpen hori).

Esan izan denez, Zurriolako lur mugikorretako parte bat, gehienbat hondartza eta hondar-dunak, Udalak saldu egin zituen, Napoleon-en kontrako gerratean bizkarreratutako zorrak kitatzeko (1809). Baina hurrengo salmenta handia, lehen karlistada bukatu eta berehalaxe, 1840koa izan zen: hondartza haietan zuhaitzak landatzeko Tomas Gros-ek (1797-1880) egindako proposamenari erantzunez, Udalak hango 226.000 $m^2$ saldu zizkion, 1.820 pezetatan. Une hartan hasi zen auzunearen historia berria[10].

Hurrengo hamarkadetan, bi egiteko nagusi izan zituzten T. Gros-ek eta beronen ondorengoek: merkatal eskeari erantzunez, atalka-atalka komeni zena salduz joan (trenbiderako, lantegi berrietarako, Kasinorako, etab.), eta aldi berean, eremua birbaliotuz ibaiaren bokalean (Santa Katalinatik hasita) murru segurtagarri bat eraiki (1907…). Elizgintzak ere izango ote zuen lekurik Groseko hirigintza hartan? Diozesi gazteak ba ote zuen zer esanik jaiotzear zegoen Auzo horretan? Egia esan, abagune ona zen hura, Parrokienari ekiteko.

Diozesiaren borondatearekin bat etorri ziren donostiar eta auzotarrenak ere. Oro har, 1881ean egin zen Gasteizko Elizbarruti gaztearen parrokiarteko birmoldaketa osoa, Erret Dekretu eta guzti: herriz herri, auzoz auzo, bakoitzari bere Parrokia izendatu zitzaion, maila ezberdinetako Parrokiatan multzokatuta (*de entrada, ascenso, término*); era berean, Parrokia bakoitzean izango ziren Erretore edo Bikarioa, apaiz laguntzaile edo benefiziatuak aditzera emanda zeuden; guztion soldatak ere han zeuden izendatuta.

---

9. ELEJALDE 1996: 9-36.
10. MURUGARREN 1978: 164-166.



**San Ignazio Parrokia (1887)** Denbora luzez Gros-eko San Ignazio eliza izan da egiatar guztien Parrokia, harik eta 1965ean frantziskotarren elizari egiteko hori eman zitzaion arte. Geroztik etorri dira Egiako beste Parrokiak ere.

### *1.2.2. San Ignazio Parrokia (1883, 1897)*

Guztien gogoak, ba, Donostian bi Parrokia sortzera bultzatu zuen Elizabarrutia: Artzain Onarena, Kortazar-en Hedagunearen hegoan, eta San Ignaziorena, Urumeaz beste aldean.

Donostiako hegoaldeko Hedagunean eratu nahi zen Parroki barrutirako (Artzain Onarena izango zen hartarako, alegia) eliz eraikina badirudi 1881ean bertan jasotzen hasi nahi izan zela, Murugarrenek adierazten digunez; dena den, 1883an antolatu eta banatu zituen Gotzainak Parrokia berriko ardura eta egitekoak, eta 1885ean ireki zen kapera bat San Martzial eta Urbieta kaleetako kantoian; baina, hau txikiegia izaki, behin-behineko

elizatxo bat ere ireki zen ondoren, Loiola eta Arrasate kale-ertzean: Jesusen Bihotzarena (1888). Eta urte berean jarri zen Artzain Onaren eliza izango zenaren lehen harria, 1888ko irailaren 29an, gero, eraikita, 1897an estreinatu zena[11].

Hegoaldeko Hedaguneari eliza hori ematen zitzaion bitartean, Urumeako eskuin aldean ere ari ziren urak mugitzen. Hiritarren gogoak eta aurreikuspen ofizialek babesturik 1883tik aurrera jarri zen abian Gros-eko Parroki Proiektua. Baina sorrera juridikoak ez zuen, beste gabe, eliz eraikinarena konpondurik utzi. Lehen urte haietan (1883-1897), garai bateko frantziskotarren komentu ohiaren lurretan jasoriko Erruki-Etxean izan zuen Parrokiak behin-behineko egoitza. Hori horrela, asmoa pausuz pausu joan zen aitzina.

1892an T. Gros zenduaren arreba Agedak eman zituen lurrak, doan, eliza berrirako. Auzotarren, Gotzainaren eta Udalaren arteko hitzarmen batek bideratu zuen proiektua, eta 1892ko irailaren 25ean ezarri zen lehen harria. Bi urteko epea jarri zitzaien eraikuntza lanei, burutzeko. 1894an onartutako Groseko Hedapen Planak ere oso aintzakotzat hartu zuen Parrokiaren eraikuntza, eta udal arkitektoak jasotako eliza hau Auzoaren bihotz bilakatuko zen laster[12]. Baina 1897ko uztaila arte ez zen estreinaldia egin ahal izan. Hilaren 24an egin zen, ospe handiz, elizaren irekialdia, María Cristina Ama-Erregina, Alfontso XIII.a eta Gasteizko Piérola Gotzaina tartean zirela[13].

Handik aurrera San Ignazioko eliza Groseko Auzoaren parte eta erdigune bilakatu da, jaso zenean noski, baina baita gero ere. Gros-eko erdigunea, eta ez hainbeste Egiakoa, egiatar askorentzat urrunduz joan baitzen San Ignazio, eta inguruak hiriztatuz aurrera egin zuten heinean, Parroki barrutiak gorputz sozial eginagoa izan zuen bere inguru hurbilenean, izan ere hamarkada batzuen buruan Gros Auzoa ez zen izan gehiago garai bateko hura, Auzo ongi biztanleztatu eta eratua baizik.

Bien bitartean, baina ez aldi berean, Parrokia berrikoa zen "beste" betiko Egiak (Atotxa barne) berariazko bere ibilera urratu zuen. Horren argigarri bezala ekar daitezke hona Groseko eta Atotxa-Egiako bi hazkunde ezberdinen datu demografikoak:

---

11. Artzain Onaren historiaz ik.: MURUGARREN, L. (1975): *Catedral del Buen Pastor de San Sebastián*. San Sebastián: CAM. 13, 14, 16, 1928. Ik., gainera, ANTIA MUNDUATE, A. (1998): *El Buen Pastor. De Parroquia a Catedral. 1897-1997*. Donostia-San Sebastián: Kutxa.

12. CUADRA ECHAIDE, P. (1974): *Parroquia de San Ignacio de Loyola. San Sebastián.* San Sebastián: CAM. *Passim*.

13. San Ignazioko Parrokiaz dugun historiarik landuena ondoko hau da: ELEJALDE ALDAMA, F. (1996): *Loiolako San Ignazio Parrokia. Donostia, 1897-1997*. Donostia-San Sebastián. (Gros-eko Parrokiaz ari da, noski, liburua).

EGIA-GROSEKO BIZILAGUNAK (1887-1975)[14]

| *Bizilagunak* | *1896/87** | *1925* | *1950* | *1975* |
|---|---|---|---|---|
| Gros | 3.215 | — | 26.000 | 22.000 |
| Egiako | 1.083 | 5.081 | 12.000 | 20.082 |
| **Orotara** | **—** | **—** | **38.000** | **42.082** |

* Gros, 1896 (Elejalde 1996: 42); Egia, 1887.

Horrela, ba, bi hazkunde kontrajarri ditugu: ez aldi berekoak, erritmoz ezberdinak, bakoitza bere gisara burutua. Ondorioz, eta bakoitzaren nortasun hiritarra egin-finkatu ahala, elkarrengandik urrunduz joan ziren Gros eta Atotxa-Egia berriak, beren arteko (des)harremanetan. Biek egiten zuten Parrokia bat, baina gero eta gehiago bi bizigune ezberdin bilakatu ziren.

1937an San Ignazioko kristauartea 19.550 lagunekoa zen, handiegia eta zabalduegia, eta hamarkada bat geroago askoz haziagoa oraindik: 38.000 ziren San Ignazioko eliztarrak (1948)[15].

Egiaren biztanlezko garapen-une handia 1940tik aurrerakoa izan zen, 1970aren inguruetan kasik Grosen tamaina berdintzeraino. Baina horren aurretik ere, 1920.etan alegia, kristauartearen aldakuntza nabarmen honek argitzen du San Ignazioko Erretoreak frantziskotarren komentuaren sortzean izan zuen aldeko jarrera.

Premia pastoral larria arintzera etorri ziren, ba, frantziskotarrak, 1920.etan noski, baina batez ere hurrengo hamarkadetan. Hala ere, komentua ezohiko irtenbide instituzionala zen (komentu-eliza bai, baina Parrokiarik ez). Denboraren poderioz onartu zen, azken buruan, bertako Parrokiaren baten bidezko erantzunaren arrazoizkotasuna.

## 2. Egiako parrokia berriak (1959-1971)

Gros eta Egia (San Ignazio Parrokiaren barrutikoak biak) hazi eta heldutasunera iritsi ziren laurogei urtetan Parrokia bakar bat izan zuten bi Auzoek. Hau da 1883tik 1959a artean ez zen hartu Parrokia berririk sortzeko deliberamendurik, nahiz eta halako hazkundea zinez berria bizi izan bi Auzoek, etxegintzan bezala demografian. Dena den, egoera hau Hiriko eliz politika instituzional orokorrago baten barnean lekutu behar da.

---

14. Iturriak: Egiarako, lehendik aipatuta ditugunak. Groserako: 1887an Gros-ek ez du, artean, nortasun demografiko bereizirik; Anabitarte 1971: 228; *Futuro urbanístico 1980*: 73, 83.

15. Elejalde 1996: 201.

Gauzak ez ziren bideratu Donostiako Elizbarrutia eraiki (1949) eta berehala. Aitzitik, bertako Font i Andreu lehen Gotzainaren (1950-1963) azken urteetan heldu zitzaion aurrez aurre Hiriko Parrokiartea berrantolatzeari, eta geroago osatu zen Egiakoa.

Hirian, lehen urrats handia 1959an eman zen, ez Parrokia bat, baizik Parroki multzo berri bat sortzean[16]; ondoko hamarkadan etorri ziren besteak.

### *2.1. 1959-1961.etako erreformak*

Erreforma-dekretuak Gros-eko San Ignazio eta Herrerako San Luis Gonzaga bi Parrokien barrutiak aldatzea ekarri zuen, Parrokia berriei leku egitearren. Aldakuntza handiak, noski. Parrokia berriak ondoko hauek izango ziren, adierazten zen kristau-kopuruekin[17]:

PARROKIA BERRIAK: KOKALEKUAK, KRISTAUAK (1957-59)

| *Parrokia berria* | *Kokalekua* | *Kristauak* |
|---|---|---|
| Miren Bihotza | Nafarroa-Sagues | 5.830 |
| San Pio X | Gros-Jai Alai | 4.500 |
| San Joan Bautista | Ategorrieta- Marrutx. | 4.860 |
| Gurutze Deuna | Intxaurrondo | 2.030 |
| Maria Erregina | Egia-Iruresoro | 6.610 |
| [Maria Magdalena | Atotxa-Txurrutal | 5.200] |

Hortaz, sei Parrokia berri bat-batean! Erreforma atzeratu baten irtenbidea zen, noski. Antolaketa berriak Parrokia zaharrak ere ukitu zituen, eta San Ignazio 13.600 bizilagunekin geratu zen eta Herrerako San Luis, ostera, 6.116rekin.

Azpimarratzekoa da, gainera, Parrokietako bati ermita zahar baten izena eman zitzaiola (Sta. Magdalena) eta esan ere esan zela Atotxa-Txurrutal (frantziskotarren komentu zaharraren izen bera hauxe) deitu zen barrutia hartuko zuela. Barruti hau Sta. Katalina zubitik eta Mirakruz kaletik hegoaldera zetorren, Baskonia plazatik gora, Urigain, Konkorreneko Bidetik Egia kalera, eta Tabakalera ezkerrera utziz, trenbide gainetik

16. *BOOSS*. X, 1959, 215-223.

17. Estatistikak Dekretuan ondoko ohar honekin emanda daude, 1957koak direla esanez: “El número de feligreses comprendidos dentro de estos límites, según datos facilitados por la sección de Estadística del Excmo. Ayuntamiento de esta ciudad, relativos al 31 de diciembre de 1957…”

María Cristina zubiraino, azkenik ibai-erdiko lerro bati segituz Sta. Katalinaraino iritsi arte[18].

Ikusten denez, Sta. Magdalena Parrokia izan behar zuenaren barrutiak oso-osorik inguratzen zuen frantziskotarren komentua; baina ez zen, artean, egoki ikusi San Frantziskoko komentu-eliza bera Parrokia bihurtzea, nahiz eta beste erlijiosoren eliza bat, klaretarrena, ontzat emana izan zen (Miren Bihotza).

Dena den, delako Santa Magdalena Parrokia, eliz egoitzarik gabe jaioa, ez zen sekula indarrean jartzerik izan: lekurik ez zuelako, eta agian itxura handirik gabeko asmazioa zelako ere.

Donostiako parrokiarteko bigarren erreforma larria, 1961ean jarri zuen abian Font i Andreu Gotzainak, beste bost Parrokia berri sortzean. Artzain Onaren eta Antiguako San Sebastian-en Parrokiak ukitu zituen batez ere birmoldaketa honek, eta ondoko Parrokia hauek sortu ziren orduan: Easo kaletik Amara-Errondo alderako Santiago Parrokia, Amarako Sendi Santuarena, Aieteko Gurutze Santuaren Parrokia, San Martin Gotzainarena gaurko Easo kalean eta Ibaetako Espiritu Santuaren Parrokia.

Baina, hori dena gorabehera (1959koa ere gogoan izan arren), Egia-Atotxa esango genukeena irtenbide onik gabe zegoen urte batzuk geroago ere, San Frantziskori Parroki eginkizunik ezagutu ez zitzaionez; bestalde, ez zen nonbait erraza Sta. Magdalenako Parrokia bideratzea. Hau guztia tarteko, egoera hori gogoratuz hasten da 1965ean L. Bereziartua Gotzainaren agiria:

> *Habiendo visto... el* [expediente] *de situar la sede de la parroquia de Santa María Magdalena, erigida en el año 1959 y que hasta la fecha ha seguido unida a la parroquia de San Ignacio...*

### *2.2. Sta. Magdalena/San Frantzisko Parrokia (1965)*

Atotxa-Egiako frantziskotarren Parrokiaren sortze-data 1965eko uztailaren 3koa da[19]; baina Gotzain-Dekretuaren aurretik, Kantabriako Probintziak eta Elizbarrutiak hitzarmen baterako elkarrizketak izan zituzten, bi aldeen eskubide eta betebeharrak zehazteko[20].

---

18. *BOOSS*. 1959, 217-218.

19. *BOOSS*, XVI, 1965, 270-273.

20. (1965…): *Documentos relacionados con el establecimiento de la Parroquia en nuestra iglesia (1965, 1966, 1971)*. ACSS, carp. 2, doc. 30. (1965): *Convenio entre la Diócesis de S. Sebastián y la Provincia de Cantabria para la erección de la Parroquia de Sta. Magdalena y San Francisco de Atocha. Resumen histórico por Fr. Juan Elícegui*. ACSS, carp. 12, doc. 4.

Gotzainaren proposamen zehatzak (Parrokia berriko barrutiari buruz ari zenak) 1965eko martxoaren 11ko data du, eta gerora Buletineraino iritsiko zena da; eskerronez erantzun zion frantziskotarren Senitarteak Gotzainaren proposamenari, martxoaren 19an.

Hala ere, borondatezko adostasun hark ez zituen definitzen juridikoki Probintzia frantziskotarraren eta Elizbarrutiaren arteko harremanak. Hutsune hau berehala ikusi zen Komentuan, eta harreman horiek argitzeko hitzarmen-zirriborro bat bidali zitzaion Gotzainari. Apirilaren 5ean erantzun zuen Bereziartua Gotzainak, halako hitzarmen bereziren premiarik ez zuela ikusten adieraziz, Zuzenbide Kanonikoan harremanok ongi definiturik zeudela eta.

Gotzainaren erantzun hori gorabehera, aurrera egin zuen elkarrizketak arazoa argiagotu nahirik, eta udazkenean Elizbarrutiak berak aurkeztu zuen erlijiosoen Parrokia-Komentuekin oro har zerabilen hitzarmen eredu bat, eta kasu honetarako ere, ustez, balio zezakeena, Panizo Bikario Jeneralak bidalita (06-11-1965).

Besteak beste, zera zehazten zen han: Parrokoa eta apaiz laguntzaileak Komentuko fraideetatik izendatuko zirela, Elizbarrutiko Estatutuen araberako soldatak ordainduko zitzaizkiela, Komentuaren eta Parrokiaren ondasunak eta sarrera-irteerak bereizita eraman behar zirela, Ekintza Katolikoa sortuko zela Parrokian, eta Ordenak bere kristau-elkarteak mantendu edo sortzeko eskubidea izango zuela, etorkizunean ere. Parrokia eratzeko bigarren oinarri-zutabea nolakoa izango zen bazekiten, beraz, bi aldeek.

Uztaileko Gotzain-Dekretuak Parrokiaren eraikuntzarako errealitate sozio-pastorala honela mugatu zuen: Maria Erregina Parrokiak jada bazituen 16.000tik gora bizilagun; 1959an sortutako Sta. Magdalena Parrokiari egoitzaren bat eman behar zitzaion; antolamendu berrian Maria Erregina 12.000ren bat lagunetara ekar zitekeen, eta Sta. Magdalena, ostera, jatorrizko bere 8.000tatik 12.000tara zabalduko zen; agerian zegoen, gainera, Maria Erreginatik Sta. Magdalena/San Frantziskora pasatuko ziren 4.000 kristauek Egia-Atotxarako joera zutela, berez; azkenik, Mirakruz-aldean 1959ko erabakiz Sta. Magdalenari zegokion barrutia, hobe zen San Ignaziorentzat uztea.

Arrazoi guztiok aurrean izanik, ondoko erabakia hartu zuen Bereziartua Gotzainak, 1965eko uztailaren 3ko datarekin[21]:

21. *BOOSS*. XVI, 1965, 271-272.



**Frantziskotarren Komentua (1923)** Komentu eta eliza hau Egia berriaren eragile eta zerbitzu-puntu nagusi bat izan da Auzoan, batez ere 1940-1970.etako urteetan. Idazlan honen osagarria den *Un Convento en la Ciudad* liburuan ikus daiteke beronen historia.

*DECRETAMOS:*

*1º La parroquia, que desde su erección, en 1959, se ha titulado Santa María Magdalena, se titulará en adelante SANTA MARÍA MAGDALENA Y SAN FRANCISCO DE ASÍS.*

*2º El templo parroquial de esta parroquia será la iglesia pública de los PP. Franciscanos de Atocha, a cuyo cargo se encomienda el régimen pastoral y gobierno de la mencionada parroquia en su totalidad y con sujeción a las normas del Código de Derecho Canónico y al acuerdo que se concertará con dicha Orden para todo aquello que expresamente no esté determinado en el Código.*

*3º El servicio parroquial será llevado por un párroco y tres coadjutores. La designación de las personas deberá realizarse en todo caso de conformidad con las normas del Código de Derecho Canónico.*

Sei hilabete lehenagoko Dekretu horren xedeak ahalbideratzeko eta erakundearteko lan-baldintzak mugatuz, 1965eko abenduaren 31n sinatu zuten Bereziartua Gotzainak eta Benito Mendia Aita Probintzialak hitzarmena, Elizbarrutiaren eta Ordenaren izenean. Harrezkero Parrokia has zitekeen bere bidea urratzen, eta bere jardun ofizialean[22].

---

22. Arlo honetan esandakoetarako agiriak: ACSS, carp. 12, doc. 4 eta carp. 2, doc. 30. Hemen berton ikus daiteke Aita Jeneralak Parrokiaren ardura hartzeko eman zuen baimena, 1965eko abenduaren 27ko datarekin.

1959ko parroki eraketan Santa Magdalenari emandako barrutia orain Maria Erreginari kentzen zitzaion esparru-atala gehituz osatu zitzaion, eta osaketa honen ondoren,1971-1972.etan Arantzazuko Amaren Parrokia sortzean eman zion Gotzainak azken ukitua Sta. Magadalena/San Frantziskoko eremuari[23], eta horren ondorioz gaur egun Parrokia honen eremua honela dago mugaturik[24]:

SAN FRANTZISKO/STA. MAGDALENA PARROKIAKO EREMUA

| | |
|---|---|
| **Atotxa Pasealekua** | Alde bietako zenbaki guztiak. |
| **Maldatxo Bidea** | San Antonio Klinikarakoa: zenbaki guztiak. |
| **Aldakonea** | Zenbaki bikoitiak Nazaret Ikastetxeraino |
| | Zenbaki bakoiti guztiak, “villak” barne. |
| **Frantzia Pasealekua** | Iztueta Gain-zubirainoko zenbaki guztiak. |
| **Konkorrenea kalea** | Eskuineko zenbakiak, Onkologikoraino, eta Bista Eder Etxea. |
| **Alkolea Pasabidea** | 1. eta 2. zenbakiak bakarrik. |
| **Teileria kalea** | 2. eta 4. zenbakiak (lehenago A eta B) |
| **Egiako Galtzada** | Zenbaki guztiak eta “villak”, “Elenita”-raino (berau barne). |
| **San Kristobal kalea** | Zenbaki bakoitiak (1 eta 3). |
| **Urumea Pasealekua** | Burdinazko Zubiraino. |
| **Mundaitz Bidea** | Kristinenea eta bertako etxeak, Mundaitz Ikastetxea (Sdo. Corazón) eta EUTG. |
| **Egia kalea** | Zenbaki bikoiti guztiak; bakoitietatik 11.eraino (berau barne). |

Hiriko esparru hori da, ba, Atotxako frantziskotarren Parrokiari dagokiona (1998), inguruko beste Parrokiekin elkarlanean ari delarik, noski. Berori ongi lekuturik uzteko, ez da sobera izango Egiako Auzo zabalean eta inguruetan Parrokiek ibili duten gertabidea nolakoa izan den eta gaur egun zeintzuk diren Parrokia horiek jakitea; horregatik, 1883-1971. urteetako Parrokia guztien laukia ematen dugu hemen.

---

23. BOOSS, XXII, 369-370. Ik. APCSS, karp. 12, 14/11-n J. Argaia Gotzainaren erabakia, lurralde ordenamendu berria ezarriz (09-12-1971).

24. Parrokiako Bulegoak emandako albisteak dira.

EGIA ETA INGURUKO PARROKIEN KRONOLOGIA (1883-1971)

| *Parrokiak* | *Urtea* | *Oharrak* |
|---|---|---|
| San Ignazio | 1883 | Gros-eko hondartza eta hedagunean |
| Jesusen Bihotza[25] | 1949 | Loiola |
| Gurutze Deuna | 1959 | Intxaurrondo |
| Maria Erregina | 1959 | Egia-Iruresoro |
| San Joan Bautista | 1959 | Ategorrieta-Marrutxipi |
| San Pio X | 1959 | Ategorrieta-Jai Alai |
| Miren Bihotza | 1959 | Nafarroa Hiribidea (Sagues Auzoan) |
| [Santa Maria Magdalena] | 1959 | Ez zen zinez indarrean jarri |
| Sta. Magdalena/San Frantzisko | 1965 | Atotxako Pasealekua |
| Arantzazuko Ama[26] | 1971 | Aldakonea |

## 3. Egiako erlijiosoen Etxeak

Parrokien sortzea oso atzeratu baldin bazen ere, besterik gertatu da Egian ireki izan diren Erlijioso-Etxeekin. Fraideenak gutxi eta konta-errazak izan dira, baina aski ugariagoak mojenak. Etxe hauek egiatarren artean izan duten eragina batzuetan egunerokoa izan da, eta bertatik bertarakoa. Hau da, batez ere ikastetxeen kasuan, oso egiatarrentzat lan egin dute, eta moja-etxeak bertako familietara egunero iritsi izan dira, seme-alaba ikasleen bidez. Osasun-zerbitzuetan ibili izan diren lekaime-elkarteak, berriz, zerbait urrunago geratu izan dira, baina betiere egiatartasuna galdu gabe.

Zalantzarik gabe, Erlijioso-Komunitate horiek merezi dute hemen beren historia gogoan hartzea, bederen; baina historiatan zerbait sartu nahi izanez gero, sobera zabaldu beharko genuke hemen. Horregatik, egitekoa mugatuz, orrialde hauetan guztion presentziaren lekukotasunik uzteko asmoarekin, denen izen-zerrenda emango dugu bakarrik; hori, bai, bakoitzari dagokion kronologia finkatuta utziz.

---

25. BOOV. LXXXV, 1949, 8-14 (06-07-1949). Ik. Loiolako Parrokiaren historia: Elejalde 1998: 223-257.

26. BOOSS. XXII, 1971, 369-370 (09-12-1971). Dekretua lehen Parrokoaren izendapenarekin izango zen bere indarrean, 1972ko otsailean hain zuzen, Generoso Güembe izendatu zutenean (cfr. BOOSS, XXIII, 1972, 42).

Hona, ba, Erlijioso-Erakunde bakoitzaren laguntzaz osatu ahal izan dugun laukia[27]:

EGIAKO ERLIJIOSO-ETXEAK ETA BESTELAKO ELIZ ELKARTETXEAK (1999)

| *Ordena/Elkarte erlijiosoa* | *Eraik.-urtea.* | *Etxea* | *Zerbitzu-arloa* | *Kokalekua* |
|---|---|---|---|---|
| Frantziskotarrak[28] | 1923… | Komentu-elizak | Pastoraltza | Atotxa |
| Sortzez Garbiaren Frantziskotar Misiolariak[29] | 1938… | Villa Toledo Resid. La Paz | Hezkuntza Gizarte-laguntzak | Egia Gaina |
| Karmeldar Misiolari Ortozak[30] | 1928-1984 | S. Antonio Klinika | Osasuna | Konkorrenea |
| Paulgo San Bizenteren Karidadeko Alabak[31] | 1923-1983 | Hospital Militar “Gen. Mola” | Osasuna | Atotxa |
| Paulgo San Bizenteren Karidadeko Alabak | 1933… | Radio-Quirúrgico | Osasuna | Aldakonea |
| Paulgo San Bizenteren Karidadeko Alabak | 1975-1989 | “Sta. Luisa” Etxebizitza arrunta | Gizarte-laguntza | S.Kristobal kal. |
| Santa Anaren Karidadeko Ahizpak[32] | 1940-1956 | Sanat. Quirúrgico Dr. Martín Santos | Osasuna | Egia Gaina |
| Domingotar Sta. Katalinarenak[33] | 1911-1972 | Villa Rosario | Osasuna | Jai Alai |
| Behartsuen Ahizpatxoak[34] | 1879-1992 | Babes-Etxea | Gizarte-laguntza | Konkorrenea |
| Mariaren Aurkezpeneko Ahizpak[35] | 1907… | Villa Oteiza | Hezkuntza | Atotxa |
| Aholku Oneko | 1956-1992 | Martín Santos Kl. | Osasuna | Egia Gaina |
| Frantziskotarrak[36] | 1992… | Etxebizitza arrunta | Osasuna, etab. | Tolaregoia |
| Maria Laguntzailearen Alabak[37] | 1954… | Escuela Hogar | Hezkuntza | Aldakonea |
| Mariaren Lagunarteko Anaiak[38] | 1973… | M. Erregina Parr. | Pastoraltza | Ametzagaña |
| Pauldarrak[39] | 1972-1986 | Arantzazu Parrokia | Pastoraltza | Konkorrenea |
| Sortzez Garbiaren Semeak[40] | 1962… | Villa Urigain | Gizarte-laguntzak | Jai Alai |
| Probidentziako Gap-eko Ahizpak[41] | 1976… | Etxebizitza arrunta | Zerbitzu ezberd. | Jai Alai |
| Jesusen Lagundia[42] | 1965… | EUTG | Irakaskuntza | Mundaitz |
| Jesusen Bihotzaren Anaiak[43] | 1959… | Col. Sdo. Corazón | Irakaskuntza | Mundaitz |
| Teresatarrak[44] | 1926… | Res. Instit. Teres. | Irakaskuntza | Frantziako Pas. |

---

27. Lauki honetan erlijiosoen etxeak aipatuko dira, eta bat izan ezik horrelakoak izango dira aipatutakoak; baina bada bat, erlijioso-etxe izan gabe, eliztar fededunen elkarte batekoa dena: teresatarrena (ik. hauei dagokien oharrean esango duguna). Iturriak: (1954): *Guía de la Iglesia en España.* Madrid. 382, 383-384. (19753): *Guía de las Comunidades religiosas femeninas de España*. Madrid. 378-380. (1987): *Guía de las comunidades de los religiosos españoles*. Madrid.Confer. 268-269. (1988): *Guía de las comuni-*

. . .

. . .

*dades de religiosas en España*. Madrid: Confer. 442-445. [LARRAÑAGA, T.] (s.d.): *Fraternidades Franciscanas [del territorio de la Provincia franciscana de Cantabria]* Aránzazu: EFA. 33-35. Argitalpen hauen ondoan S. Mujika gogoan izan dugu: MUGICA, S. (1917): *Guipúzcoa*, in: *Geografía general del País Vasco-Navarro*. Barcelona. 601-602. Bertan ageri da, data hartan San Ignazio Parrokiako Komunitate erlijiosoen zerrenda. Horietako zenbat diren Egiakoak jakitea ez da beti erraza; horregatik datuok aintzakotzat hartu arren, argibideak osatu egin behar izan ditugu hemen. Horretarako Kongregazio bakoitzeko agintari eta artxibo-arduradunengana jo behar izan dugu: hemengo data eta xehetasunak, ba, iturri horietatik jasotakoak dira, azken finean.

28. Frantziskotarrak = Franciscanos$^{ofm}$.

29. Sortzez Garbiaren Frantziskotar Misiolariak = Franciscanas Misioneras de la Inmaculada Concepción.

30. Karmeldar Misiolari Ortozak = Carmelitas Misioneras Descalzas. 1984ko maiatzaren 24an utzi zuten Klinika. (Albisteak Maria Rosa Miranda Mutiloa Ahizpari zor dizkiogu). San Antonio Klinika izandakoa gaur egun bestelako zereginetarako dago: “Laneango Segurantza eta Osasunbiderako Gabinetea” dago bertan (gaztelaniaz “Gabinete de Seguridad e Higiene en el Trabajo” deritzana, alegia)

31. Paulgo San Bizenteren Karidadeko Alabak = Hijas de la Caridad de San Vicente de Paúl. Kongregazioko Idazkaritza Probintzialetik emandako urteak dira (eskerrak Aurea Novo idazkariari), Elkarte bereko hiru etxeetarako. S. Mujica 1917: 602. orrialdean Kongregazio honetako bi Etxe ageri dira (1836 eta 1888koak omen). Ez dakit hauek Egiakoak ziren ala ez.

32. Santa Anaren Karidadeko Ahizpak = Hermanas de la Caridad de Sta. Ana. Lehen Komunitatea bost lagunekoa izan zen. Klinikaren ardura Martín Santos semearen eskuetara pasatu zenean, desadostasunak sortu ziren Ahizpartearen eta Erietxeko jabeen artean, hasierako hitzarmena ez zela betetzen eta: 1956an utzi zuten, ba, gaixo-etxe hau Ahizpa hauek. (Araceli Gimeno Ahizparen albisteak, Egoitza Jeneraletik emanak).

33. Domingotar “Frantsesak” = Dominicas “Francesas” deitu izan zitzaien. Hau ez da, noski, Kongregazioaren izen ofiziala, Donostiako herritarra baino. Kongregazio ezberdinetako Komunitateei deitu izan zaie horrela, “frantsesak”, jatorriz halakoak zirelako (XX. mende-hasieran Combes-en legeen ondorioz hona etorritakoak, gehienak). Hemen aipatzen ditugun hauek “Sœurs Dominicaines de Ste. Cathérine de Sienne d’Albi” dira, gaur egun ere beren ama-etxea Albi-n dutenak (Errepublika Frantsesean, Tarn Departamentuan). Klinika izan gabe, osasun-zerbitzuak eskaini zituzten Villa Rosariotik (Jai Alai). 1905ean heldu ziren Donostiara, eta azken etxe honetara (Zubiaurre Pasealekua, 6) aldatu aurretik, beste bi egoitza izan zituzten hirian, San Martin eta Manterola kaleetan. 1972an Elizbarrutiak hartu zuen etxe hau, apaizgaien egoitza izateko (Albisteok Sœur Paule Leguitte Prioresa Jeneralari zor dizkiogu).

34. Behartsuen Ahizpatxoak = Hermanitas de los Pobres. Kongregazio hau sortzez frantsesa da (Petites Sœurs des Pauvres, 1839), eta Donostian sartu zen urte berean (1879) onartu zitzaizkion bere lehenengo Konstituzioak Erroman. Ik. *DIP*. VI, 1980, 1623-1624. Donostian 1879ko apirilaren 24an eraiki zen Ahizpartea, eta 1992ko martxoaren 9an desegin. (Albisteak, Barcelonako egoitza probintzialeko Nagusia den María Purificación Anaya Ahizpari zor dizkiogu. 1999ko apirilaren 4an). Kongregazio hau ez da nahasi behar “Hermanitas de los Pobres Desamparados” deritzanarekin.

35. Mariaren Aurpezpeneko Ahizpak = Hermanas de la Presentación de María. Mariaren Aurkezpeneko Ahizpak Frantziatik etorri ziren, 1905ean, eta Hondarribian hartu zuten Penintsulako beren lehenengo etxea. Handik etorri ziren Atotxara.

. . .

Hamarkada horietan zehar, Erakundeok ez dira denak batera eta denbora guztian egon Auzoan. Bestalde, baliteke Komunitateren baten albistea (agian denbora laburrean eta aspaldi batean egona) jaso gabe utzi izatea, bestelakorik nahi bagenuen ere. Dena den, zerrendak balio du, hasteko, gerora etorriko diren historialarientzat abiapuntu bezala. Egiaren zerbitzuan jardun duten Erakunde hauen historia Egiarena berarena ere bada, eta aintzakotzat hartu beharko dira XX. mendeko Egiako kondaira erlijiosoa ezagutzeko.

———

. . .

36. Aholku Oneko Frantziskotarrak (lekaimeak) = Franciscanas del Buen Consejo. 1956-1992.etan Martín Santos Klinikan lanegin eta bizi izan ziren, hasieran 37 gaixo-ohe zituen Klinikaren zerbitzu-ardura guztiak beren gain hartuz (sei Ahizpa izan ziren lehenengo hartan etorri zirenak); 1992tik aurrera, Komunitate bera etxez eta lanbidez aldatu zen, Tolaregoia auzo berrira joana zelarik. (Ana Maria Santos Ahizpak bildutako albisteak)

37. Maria Laguntzailearen Alabak = Hijas de María Auxiliadora. Data Karmen Iriarte Ahizpak emana. Bost lekaimerekin hasi omen zen Ahizparte hau, eta 1974tik aurrera Atotxako Parrokiarekin lankidetzan jardun izan du, Liturgian lagunduz eta organoan (Asun Salaberri Ahizpa organo-jole zelarik).

38. Mariaren Lagunarteko Erlijiosoak = Religiosos**.** de la Compañía de María (*Marianistas*).

39. Pauldarrak = Paúles.

40. Sortzez Garbiaren Semeak = Hijos de María Inmaculada. *Pavoniano* ere deituak. 1962ko azaroaren 10ean jarri ziren bizitzen erlijiosoak Urigain etxean. 1962-1972.etan Fraidegai-Etxe izan zen berau, eta 1972-1978.etan, berriz, Nobizio-Etxe; 1978-1984.etan ez zuen jarduera berezirik izan, eta 1985etik aurrerakoan toxikomanoen zerbitzuan ari da, "Fundación Izan/Proyecto Hombre" deritzanaren barnean.

41. Probidentziako Gap-eko Ahizpak = Hermanas de la Providencia de Gap.

42. Jesusen Lagundia = Compañía de Jesús (*Jesuítas*). Komunitate honen etorrerako albisteak (eta Ikastetxearen sortzeaz ere): ARBUNIES, J. (1995): "La Universidad de Deusto en San Sebastián", in: *Sapientia mellior auro. Una visión histórica y descriptiva de la vida universitaria de Deusto*. Bilbao: Univ. de Deusto. 133-149. Brunet-Enea utzita etorri zen hona taldea.

43. Jesusen Bihotzaren Anaiak = Hnos. del Sdo. Corazón (*Corazonistas*). Kongregazio hau ere, Donostian mende honetan izan ditugun beste zenbaiten antzera, sortzez frantsesa da, garaiko politikak horretara bortxaturik muga pasata etorria (1903). Errenterian beren lehen ikastetxea ireki ondoren (1903) iritsi ziren Donostiara fraide hauek (1904): Igentea eta kale Nagusiaren ertzean izan zuten lehen egoitza, eta ondoren Sánchez Toca 9an jarri zuten bizilekua, eta ireki Ikastetxea (1905-1973). (Sánchez Toca-ko horren albiste laburra: Peña 1999: 102-103). Anaiartea 1959an jarri zen bizitzen Mundaizko egoitza berrian, nahiz eta Jesusen Bihotzaren Anaiarteko jargoiratzea 1957an egin zen (*Anuario* 1995-1996: 17. or., eta Malumbres 1998: 6). Ik. xehetasun gehiago: Suescun 1984: 15-17.

44. Teresatarrak = Teresianas (*Institución Teresiana*). Teresatarrak ez dira, legez, lekaime erlijiosoak; "Institución Teresiana" deritzana (Poveda-k sortua) laikoen eliz elkarte bat da ("fededunen elkarte bat", alegia); berorretako kideak norbera bere etxean bizi ohi da, eta batzuetan "bizi-taldeetan" elkarturik. Lehen egoitza Prim kalean jarri zuten, 1921ean, eta 1926an aldatu ziren hona. Frantzia Pasealekuko etxe hau irakas-eginkizunetara emana egon da, orain gutxi arte. (Albisteak Práxedes Gutiérrez andreari zor dizkiogu).

Erakunde horiek gertatu dira, kronologia horren arabera, Egiako kristauartea moldatu dutenak. Esan beharra dago, hala ere, Etxe bakoitzak eta Elkarte erlijioso bakoitzak gisa ezberdinetan bete duela bere lekua Egia-Atotxan, tamaina ezberdineko zama eraman duelako, alde batetik, baina baita bakoitzak berariazko lan-eremua ere izan duelako.

Komunitate hauetako gutxienak ziren Pastoraltzara emanak, beronen adiera hertsian behintzat, eta gehienek osasun- edo hezkuntza zerbitzuetan ziharduten. Guztiok ezagutu ditugu San Antonio edo Martín Santos Kliniketako mojak, nahiz Babesetxeetako zerbitzuak beren gain izan dituzten lekaimeak. Orobat, beste zenbait moja Hezkuntzara emana bizi izan da, Ikastetxeetan, eta sarritan katekesian jardunez.

Frantziskotarrek, (*Un Convento en la ciudad*-en ikus daiteke) erlijiosoen lagunarte hauei beren zerbitzu pastorala eskaintzeko aukera izan dute, eta Atotxako komentuko paperetan behin eta berriz aipatzen dira horrelako lanak. Fraideen zerbitzu honek bi gisatan ziharduen holakoetan: erietxeetako gaixo edo ezinduen ardura espirituala hartuz, edoeta zerbitzuetxe horietako (ikastetxe nahiz klinika) erlijiosoei eliz zerbitzuak eskainiz (Mezak, aitor-entzuteak, etab.).

Egia-Atotxako erlijioso-etxeek, beren Babesetxe, Klinika edo Ikastetxeetan, Auzoari berari ez ezik, inguruetako Auzo edo herriei ere eskaini eta eman izan dizkiete beren zerbitzuak. Alde honetatik, heinen batean, merkataritzan ikusi dugunaren antzeko zerbait daukagu hemen ere, Egiako mugak gainditu egin izan dituztela erlijioso-etxe hauen lanek.

Idazlan hau, noski, erlijioso-etxe jakin baten inguruan mamitu da, eta berorren historia arreta handiagoz aurkeztea dagokigu: esan bezala, frantziskotarrekiko hori erdarazko monografia aipatuan dago.

### 4. Auzoko Elkarte herritarrak

1975aren aurreko hamarkadetako Auzoko elkar-bizitza hein handien batean eliz erakunde edo elkarteen inguruetan bildu baldin bazen, Auzoko gizartearen heldutasun handiagoarekin eliz babesetik at hainbat elkarte herritar berri sortu da Egian, Auzoaren bizi-sustapenerako, xede eta mota ezberdinetakoak sortu ere.

Liburu honen mugek ez digute uzten Egiago Elkarte historiko eta gaurkoen iragan osoa hona ekartzen, nahiz eta, egia esan, honelako Auzo bateko elkarte zahar eta berrien, indarrean dauden edo desagertuen historia landu bat idaztea lan ongi interesgarria litzatekeen. Hala ere, ez dugu liburu honetatik kanpo utzi nahi Elkarte herritarren mundua, Auzoan halako pisu eta esanahia dituena.

Erdarazko testuan eman dugu eliza-komentuan sortutako eliz elkarteen berri nahikoa zabala (guztiz oso eta biribila ez bada ere); esan dugu, gainera, hastapen haietatik herritarren beste elkarte zibilek ere izan zutela iradokizunik eta ikasitakorik, baina lagunarte eliztar eta sozialen arteko zubia nola egin zen, edo ez zen, jakiteko aukerarik ez dugu izan testu horretan. Bego hori, oraingoz, beste ikaslanetarako. Muga guztiokin ere, esan nahi dugu gaur egungo elkarteez hemen zerbait.

Donostiako Udaletxeko *Auzoak eta Herritarren Partaidetzako Bulegoa*-ri zor dizkiogu lehen albisteak. Gainerako notizia osagarriak elkarteetatik bertatik osatu ditugu. Harreman hauek, gainera, Elkarteon errealitatea zein mugikorra den erakutsi digute. Bi iturrietatik ikasitakoez egin dugu hemengo hautapena.

### *4.1. Mota ezberdinetako Elkarteak (1999)*

Auzoko gizartearen aniztasuna eta bertako herritarren kezka, behar eta gogoen aberastasuna erakusten du Egiako Elkarte herritarren zerrendak: Udal-Erregistroan ageri diren Egiako elkarteak 63 dira orotara (1999ko Urrian). Esan behar da, hala ere, horietatik batzuk jada desagertuak direla, eta beste zenbait lozorroan dagoela. Horregatik, lehen hurbilpen bezala (eta betiere praktikotasunari begira), aukera bat egitea erabaki dugu, ondoko laukian emango duguna.

Bestalde, Elkarteok ez dira sailkatzen errazak: Udal Erregistroak bere gisara eginda du sailkapena, eta guk, hemen, bi irizpide ezberdin eta elkarren osagarri erabili ditugu ondokoa eskaintzeko. Alde batetik, Auzoko jendetzari dagokiona (Auzoa bere osoan, talde sozial ezberdinak eta jakinak), eta, bestalde, Elkarteak bere jardunean berezikiago ukitu ohi duen lan-arloa (kultura, kirola, aisia, eta beste).

Udal Erregistroan, mota ezberdinekoak eta elkarren osagarriak dira lagunarte horiek, Auzo osoari edo gizarteko sektore sozial ezberdinei erantzuteko: Auzotarren Elkarteak daude lehenik, eta gero, Aisialdi-Elkarteak, Laguntza-Taldeak, Kultur Elkarteak, Ikasle-Elkarteak, Kirol-Elkarteak, Elkartea Errekreatiboak, Musika-Elkarteak edo Hauta-Elkarteak (*alternativos*).

Hasteko, auzotarren premiei tokian tokiko elkartasunean erantzun nahiak Auzotarren Elkarteak sortu ditu (erdaraz AA. VV. bezala aipatuak: *Asociaciones de Vecinos*), eta ez bat edo bi, dozena-erdi bat ageri baita Erregistroan. Guk hemen bizpahiru zinez bizietara mugatu dugu saila. Segur aski honelako bakoitzaren sortzean arrazoi berdin eta ezberdinak egon dira, eta unean uneko premia jakin batzuk ere bai, agian. Ikusten da, adibidez, Auzoko erdigune nagusitik urrunago dauden Auzuneek inoiz

elkarte bereizia sortzearen komenentzia sentitu dutela (Urumea Pasealekuan, esaterako).

Auzoarekiko osotasun berarekin ez izan arren, elkarte sozial mugatuagoak ere badira, eremu jakinetan dabiltzanak. Horien artean ditugu Guraso-Elkarteak, Herri-Eskoletakoak bezala pribatu-sozialetakoak ere: Maria Erregina Ikastetxekoa, Aitor Ikastola edo Zuhaiztikoak.

Beharbada, honelatsu, sektore-elkarte modura ikus daitezke, era berean, adin ezberdinetarakoak: umeentzako Haur Txokoa, eta gazteenak (Ttan-Ttakun, Atotxako Gazte Elkartea, Denok Taldea, Gazte-Lokala, etab.), eta berdintsu Hirugarren Adinekoen elkarteak (izan direnak, edo direnak).

Emakumea ere ez da geratu izan arreta sektorial horretatik kanpo: orain gutxiko Zuriñe Elkartea edo Emakumeen Hiria. Arazo orokor jakinak dituzten gizarte-multzo batzuetarako ere izan da Elkarterik: banatu (euskaldun zaharrek “bizi-alarguna” bezala aipatu ohi zituztenak), zinezko alargun eta homosexualek, adibidez.

Kulturak eta Kirolak berariazko leku zabala dute Egiako Elkarteen artean, eta esan beharrik ere ez dago, guk gazteen edo gazteentzako Elkarte bezala sailkatu ditugunek ez dutela, beren aldetik, ez bata eta ez beste ahanzten, Kultura eta Kirola proposatzen diren heziketa-asmoetan biek baitute beren lekua. Honelakoetan, gainera, ia beti presente dagoen ideia da ekologiarena, eta sarritan nazioartekotasunarena ere.

Egiako hainbat izpiritu kezkatutan oso elkarturik ageri dira auzotasuna, herritartasuna, sozialtasuna, euskalduntasuna, luditartasuna, eta ardura bizi horiei erantzuteko sortu izan dira Elkarteak.

Auzoan dauden erakundeetatik sortu da hainbat Elkarte edo bilgune. Ikastetxeek, adibidez, ikasketak bukatu ondoko beren segida soziala luzatu eta segurtatu nahirik, ikasle-elkarteak eratu izan dituzte. Honelakoak Auzoari berari begira baino gehiago ikastetxeari eta beronen presentzia sozialari behatuz ari dira beren jardunean. Baina Auzoak ere, bere ekimen handietarako erabilgarriak izan ditzake ikasle-elkarteok, eta Egian aintzakotzat hartzekoak dira horregatik ere.

Denbora libreari eskainitako aisialdi-elkarteek edo kultur elkarteek erro bertakoagoak dituzte, Egiako gizarte orokorraren premiei erantzun nahi dietelako ez ezik, baita bertatik bertara erantzun nahi zaielako ere, Auzoko bizi-kalitatea hobetzeko betiere. Testuinguru bertsuan lekutzen dira, gainera, kiroletan nahiz jolasera ezberdinetan (erdaraz *recreativos* deitu dituztenak) dabiltzan 31ren bat Elkarte (Erregistroaren arabera kontatuak). Denak indarrean baleude, asko izango lirateke honelako Auzo mugatu baterako.

Erreparatzeko da, gizartearen, Euskal Herriaren eta munduaren ikusera eta egoera aldarazi nahi dituzten elkarteak espero zitekeen baino gehiago direla. Horrelakoen artean eman daitezke Joxe Migel Zumalabe Fundazioa, Ignazio Ellakuria Bolondresen Elkartea, Mugarik Gabe, Mugen Gainetik, etab.

Bukatzeko, esan behar da Egiak aspaldidanik duen tradizio bati jarraiki, orain ere badituela bere erakunde eta elkarteetan Auzotik kanpo ere ari diren zerbitzu-guneak, batzuetan Gipuzkoa-mailan eta ari direnak. Horien artean eman ditzakegu, adibidez, Hogares Nuevo Futuro, Haur Itsuen Guraso-Elkartea, Indarkeriaren Biktimena, etab. Batzuek berrikitan desagertuak, besteak indarrean.

### *4.2. Elkarteak banan-banan (…1999)*

Esan dugun bezala, ondoko laukian bildu ditugun albisteak ez ditutzte bizirik dauden Elkarte guztiak bilduko, eta, zer esanik ez, ez dugu modurik hemen azken hamarkadetako Elkarte egiatar guztien bilketarik egiteko. Zerbait apalagoa, eta praktikoagoa, aurkeztu nahi dugu: gaur egungo egiatarren harremanetarako Elkarte-gida txiki eta hautatu bat, batez ere bere alde sozial-praktikoagatik erabilgarri gerta daitekeena.

Laukian sailkatu egin ditugu Elkarte horiek, baso zabal horretan bakoitza kidekoekin batera emanez. Hona, ba, sailkapen horren funtsa:

| | |
|---|---|
| *Informazio eta harremanak* | Zai Zoi, Elkarteen Txokoa, Ttan-Ttakun Irratia, Egiako Koordinakundea |
| *Familia eta Gurasoak* | Latxaga, Sibilia, Zuhaizti, Maria Erregina. |
| *Hezkuntza Sozialekoak* | Familia eta Gizarte-Hezketarako Zentroa, Zirrilda. |
| *Gazteen eta Gazteentzakoak* | Antxeta, Denok, Atotxako Gazteak, Gazte Lokala, Than-Ttakun, Gazte Asanblada, Haur Txokoa. |
| *Hirugarren Adina* | Egiatarra, Txoko Berri. |
| *Laguntza Elkarteak* | Jadanik, Senideak, Eskabide, Asedivi, Gehitu, Droga-Prebentzioa, Intsumisoak. |
| *Kultur Elkarteak* | Maria Erregina Abesbatza, Ametzagaña, Trebeska, Klik. |
| *Jaiak eta Aisia* | Porrontxo Batzordea, Ur-Zaleak, Donosti Gain, Arrano. |
| *Kirol Elkarteak* | Kostkas, Xabier, Aikido Amagoia, Eskubaloia, Mundaitz, Txirrindulariak, Aitzarte. |
| *Herri eta Euskararen aldekoak* | Kriseilu Bagera, AEK Euskaltegia, JM. Zumalabe Fundazioa. |
| *Nazioartekoak* | Aiesec, Esme, Mugen Gainetik, Mugarik Gabe, I. Ellakuria, Intered Euskal Herria. |

Horrelako zerrenda soilean geratu gabe, bakoitzaren zenbait zertzelada ere bildu nahi izan dugu ondoren. Azpimarratzekoa da aipatutakoetarik batzuk zinezko Elkarteak direla (juridikoki ere finkatuak), beste batzuk Talde informalagoak dira, eta bada, azkenik, elkarte edo talde izan gabe, halakoek Zerbitzu hutsak direnak. Denek dute interesa, nahiz eta bakoitza errealitate sozial ezberdina den.

Berehalako laukian, Elkartearen izena, sortze-urtea eta bakoitzaren aurkezpen labur bat eskainiko ditugu. Ikus daitekeenez, Elkarteok gazteak dira gehienak, eta oso gazteak ere bai. Erran gabe doa, Egiako Elkarteok aurkezpen zabalagorik merezi dutela, baina hemen, besterik ezinean, horrelaxe, labur, emango ditugu. Gehiago nahi edo behar duenak Elkarteen Txokora jo dezake (tel. 943-291922), edo nahiago badu Auzoen Udal Bulegora (tel. 943-481356).

Esandako mugekin, ba, bego dena honela laburtuta, eta Elkarte, Talde nahiz Zerbitzu bakoitzaren nortasuna deskribatuta[45]:

AUZOKO INFORMAZIOA ETA LEHEN HARREMANAK

| | | |
|---|---|---|
| **Zai Zoi Elkartea** | 1996 | Euskal Herriko kultura herritarra bultzatzea da xede nagusia. Batez ere Egiako Auzoan euskal kultur ekimenei koordinazio hobe bat ematea; bertako kultur taldeei babes hobea bilatzea; ekitaldi propioak sustatzea; Auzoaz diharduten argitalpenak laguntzea, etab. Berariazko xede propioen ondoan, gaur egun Zai Zoi da Egiako erakunde, elkarte eta talde herritarren bateratze-lana Jareño Kultur Etxeko Elkarteen Txokotik daramana. Koordinazio-zerbitzu hortaz arduratzeko Udalarekin hitzarmena sinatuta du. |

45. Lauki honetarako lehenengo iturria, Donostiako Udaleko “Auzoak eta Herritarren Partaidetzako Bulego”-ko Erregistroa izan da. Eskerrik onenak eman nahi dizkiet Bulego-Burua den Eba Salaberriari, egin didan harrera onagatik, eta Elena Zaldua-ri prestatu didan berehalako erantzunagatik. Bulego honen laguntzarik gabe ezingo genuen burutu kapitulu hau. Bigarren, aipatutako Elkarte bakoitzeko albiste zuzenak jaso ditugu. Banan-banan ezin aipatu baldin baditut ere, bihoakie hemendik albiste-emaile guztiei nire eskerronaren agerpena.– Horren ondoren eta Auzoko aldaketei bertatik bertara begiratuz ari den Elkarteen Txokoa izan dugu laguntzeko. Jakina denez, berori Zai Zoi Elkartearen ardurapean dago (Jareño Kultur Etxea). Txoko honen arduradun zuzena den Ainhoa Permach andereñoari gure eskerrona agertu nahi diogu, egindako galdera eta laguntza-eskeetan halako axolaz erantzun digulako. Ikusi ahal izan dugunez, Auzoaz interesatuak ere laguntza ederrik izan lezake Elkarteen Txoko horretan.

| | | |
|---|---|---|
| **Elkarteen Txokoa** | 1998 | Udalak lokala utzita, Jareño Kultur Etxean Auzoko Elkarteek duten zerbitzu teknikoa. Zai Zoi Elkartearen esku dago berorren ardura. Idazkaritza-zerbitzuak, komunikazio eta hedapen-bideak, Auzoaz eta Elkarteez argibideak eskaintzen ditu, eta Egiako bertako berri jakiteko biderik zuzenena Elkarteen Txoko hau: tel. 943-291922; fax: 943-320743. E-mail: zaizoi@euskalnet.net |
| **Ttan-Ttakun Irratia** | 1995 | Izen bereko Elkarteak sortua, Egiako bizitzaren berri emateko; Egiako Gazte Lokalean du egoitza. Egun osoak zehar musika ematen du, eta astelehenetatik ostegunetara iluntzean irratsaioak (19,30-11,30 orduetan). 106.8an du bere frekuentzia. |
| **Egiako Koordinakundea** | 1980 | Hirigintzako arazoez arduratu da Elkarte hau, eta beste sailkapen egokiagorik ezean, hemen ematen dugu. Auzoaren aldeko lana du helburu, batez ere hirigintzari dagokiona: arazoen jarraipena eginez, informazioa zabalduz, elkarlana bultzatuz, auzotarren eskuhartzea bilatuz. Hainbat ekintzetan izan du parte: Plaza Handiarena edo Polikiroldegia bideratzen, etxebizitzen arazoak aztertu eta salatuz, etab. Argitalpenak eta erakusketak ere egin izan ditu. |

FAMILIA ETA GURASOEN ZERBITZUKO ELKARTEAK

| | | |
|---|---|---|
| **Latxaga Guraso Elkartea** | 1994 | Aitor Ikastolako ikasleen guraso-elkartea da, eta bertako xede nagusiak sustatu eta lagundu nahi ditu: D eredua segurtatzea, familietako euskara, ikastetxeko kudeakuntza eta irakaslanez arduratzea. Azpimarra daiteke, gainera: “Ikatolak bere inguruarekin, bereziki Egiako Auzoko ekintza eta elkarteekin, duen lotura finkatu eta sakontzea”. |
| **Sibilia Guraso Elkartea** | 1996 | Lauaizeta Ikastolako gurasoen elkartea da. Ikastolako xedeekin bat dator, eta eskolaz |

| | | |
|---|---|---|
| | | kanpoko jarduerak lagundu nahi ditu, eta Auzoan ospatu ohi diren urteroko jaietan parte hartu (Inauteriak, Danborrada, Olentzero, Sta. Ageda, etab.). Aitor Ikastolako gurasoekin lankidetzan ari da. |
| **Zuhaizti, Guraso Elkartea** | 1992 | Ereti Biteri Zuhaizti Eskolako ikasleen guraso-elkartea da. Sendiaren eta eskolaren arteko harremanak sendotzea; ohartuki seme-alaben hezkuntza laguntzea: eskolagazteen ofizio-irtenbideak bideratzea; eskola-inguruko ekinbideetan laguntzea; eskolako premia, lan eta ospakuntzetan gurasoen partaidetza bultzatzea. |
| **Maria Erreginako Guraso-Elkartea** | 1968 | Ikastetxe horretako gurasoen elkarte katolikoa da. Beste ikastetxeetan bezala, ikastetxe inguruko gizartearen eta haren arteko lankidetza sustatzea da Elkarte honen xedea. |

HEZKUNTZA SOZIALERAKO ELKARTEAK

| | | |
|---|---|---|
| **Egiako Familia eta Gizarte-Hezketa-rako Zentroa** | 1966 | Auzoko emakumearentzako Eskola. Helburuak: emakumearen gizarteko zinezko aukera-berdintasuna bultzatzea, kontzientzia kritikoa piztuz, kultura sustatuz, partaidetza sozial ohartua lagunduz, betiere gizartean esku-hartzearen bidez eta egoera zehatzetatik abiaturik. Bestalde, Zentroak espazio balioanitza izan nahi du, emakumezko-gizonezkoen artean, gazte-zaharragoen artean. |
| **Zirrilda Taldea** | 1995 | Sexu ikerkuntza eta hezkidetzarako taldea da hau. Hezkuntzarena da gehien landu den alorra, baina informazio-bulego bat era abian du. Aisiarako eskola batekin lan egiten du, gazte eta emakumezkoei ikastaroak ere eskainiz. |

GAZTEEN EDO GAZTEENTZAKO ELKARTEAK

| | | |
|---|---|---|
| **Antxeta Elkartea** | 1983 | Atotxako Dorre deituan du bere egoitza, eta haurrekiko ardura du batez ere: aisialdia hezgarri egin nahi du, haurren arteko solidaritate-jarrerak lagundu nahi ditu, gazteen sentikortasuna hezi arlo guztietan, eta taldebizitza jator bat bultzatu, izadiarekiko errespetuzko burubideak sustatu. Elkarte ardatza izan da zenbait ekimen sozial bultzatzeko: "Haur Txokoa" eta "Gazte Lokala", esate baterako. |
| **Denok Taldea** | 1985 | Maria Erregina inguruan, Egiako gazteek denbora librea kristauki bizi dezaten hezkuntzatik laguntzea du helburu; gazteen artean jarrera solidarioak sustatzea, eta arte-heziera, talde-lanak eta izadiarekiko ardura jator bat bultzatzea. 150en bat gazte dabiltza taldean. |
| **Atotxako Gazte Elkartea** | 1986 | Kristau taldea da, eta lehenik Katekesi inguruko heziketa sustatzen du, betiere gazteen kristau eta giza balioak zainduz; indarkeriarik gabeko gizartearen eta jarrera izadi-zaleen alde ari da, hori guztia ikuspegi frantziskotar batetik begiratuz. 110 bazkide ditu. 1999an berritu ditu bere Estatutuak. |
| **Egiako Gazte Lokala** | 1995 | Antxeta Elkartearen ekimenez sortu eta Ttan-Ttakun Elkartearen ardurapean gazteentzako eratutako biltokia da (160 m$^2$), Egiako Haur Txokoari luzapena ematen diolarik. Ametzagaina Elkarteak eta Auzoko beste zenbaitek ekonomikoki lagunduta bizi izan da. Arratsaldetan irekitzen da, eta urtean zehar lan planketatu bat burutzen du 12-17 urteko gazteekin. 250 bazkide ditu. Egunero 30/40 lagun bildu ohi dira. Gazteen ekimena sustatzea da zereginik nagusiena. |
| **Ttan-Ttakun Elkartea** | 1994 | Asti libreko elkartea da, denbora librea gazteentzako hezibide bezala erabiltzen laguntzeko, solidaritate-jarrerak landuz, talde-bizitza bultzatuz, gazteen sentikortasuna eta izadiarekiko errespetua zainduz. |

| | | |
|---|---|---|
| **Egiako Gazte Asanblada** | — | Jareño Kultur Etxean egin ohi ditu bilerak, eta lehendik zetozen gazte-lagunarteetatik sortua da, Auzoko gazteriaren arazoak ezagutu eta bideratuz joateko. |
| **Haur Txokoa** | 1989 | Antxeta Elkarteak Egiako haurrentzat sortutako biltokia da. Hamar urterainokoak biltzen ditu, hezibide euskalduna eta osoa emateko asmoz. Beronen segida, Gazte-Lokalean eskaintzen da. |

HIRUGARREN ADINEKOEN ELKARTEAK

| | | |
|---|---|---|
| **Egiatarra** | 1980 | Atotxa-Egiako Jubilatuen Etxeko Elkartea. Frantziskotarren inguruan jaio zen, eta geroztik bere bidea egin du, adinekoei biltoki bat eskainiz eta aisialdirako erraztasunak emanez. Oraingo egoitza 1983an ireki zen. |
| **Txoko Berri** | 1981 | Maria Erregina inguruan bete du bere historia. Adinekoentzat ekintza kulturalak sustatzea izan du xedetzat. Adinekoen topagunea da, eta zerbitzu-molderen bat edo beste eskaintzen dizkie (ileapaindegia, botikina, etab.). |

TALDE JAKINEN LAGUNTZARAKO ELKARTEAK

| | | |
|---|---|---|
| **Jadanik Emakume Taldea** | 1994 | Emakumeen aldeko beste lagunarterik ere izan da Egian, baina badirudi hau dela hirietan (bere geldialdi eta guzti) biziena ageri den elkartea. Emakumearen arazoak begiratu nahi ditu, herritarren kontzientziatzea lagunduz, hezkuntza eta parte hartzea eratuz, premiazko ikerlanak eginez. |
| **Egiako Senideak** | 1993 | Azken urteetako ekintza politikoen ondorioz, hainbat egiatar ere preso hartua izan da, eta berorien beharrei eta presondegietako politikari aurre egiteko dago eratuta Egiako Senideak deritzan hau, Senideak Elkarte zabalagoaren barnean. |

| | | |
|---|---|---|
| **Eskabide** | 1999 | Indarkeriaren biktimen eskubideen aldeko elkartea da. Hirian gertatutako zenbait hilketaren ondorioz sortu da Elkartea, eta beronen xedea indarkeria sozialak (politikoa aparte) sortutako egoerei aurre egitea da (familia eta pertsonen artean elkartasuna sortuz, arazoaz gogoeta eginez eta gizarte eta erakunde-baliabideak erabiliz). |
| **Asedivi** | — | "Asociación de Separados, Divorciados y Viudos" hitzen laburdura. Gero eta zabalduagoak diren bizi-egoera hauetako arazoei aurre egiteko elkartea da. |
| **Gehitu** | 1997 | Gai, lesbiana, bisexual eta transexualen arazo pertsonal eta sozialetan laguntzea, betiere guztion berdintasunak bilatuz, gizarteko heterosexualen ondoan. |
| **Drogomenpekotasunen Prebentziorako Plataforma** | 1995 | Une batez Auzoan heroina hain azkarki sartu zelarik, egoerari aurre egiteko auzotarrak Elkarte honetan bildu ziren, harik eta banaketa-sareak eta saltzaileak Auzotik aldendu ziren arte. Salaketa, mintzaldi eta abarren bidez lan egin zuen. Egiako barne-elkartasunaren adibide bat gehiago gertatu zen Plataforma honen eraketa. |
| **"Kasilda Hernáez Vargas" Egiako Intsumisoen Taldea** | 1990 | Intsumisioa eta antimilitarismoaren aldeko taldea da, gizartea desmilitarizatzeko asmoz. Batez ere Egiago gazteriari begira egin izan du lan, informazioa eskainiz, eta mintzaldiak, bideo-emanaldiak eta abar eratuz. |

KULTUR ELKARTEAK

| | | |
|---|---|---|
| **Maria Erregina Abesbatza** | 1986 | Parrokia horretako koru-egitekoak betetzen ditu abesbatza honek. Koru-musikak dituen alde soziologiko eta humanistikoa oro har arretaz zaintzean, eta berezikiago Donostian. |

| | | |
|---|---|---|
| **Ametzagaña Kultur Elkartea** | 1983 | Euskararen ezagutza eta erabilpena sustatzea du xede nagusi. Horretarako kultur ekintzak lagunduko ditu, Auzoko jaiak, etab. Oro har, gazteen euskaltasuna eta heziketa laguntzeko ekimenak berariazko alorra ditu. Beren-beregi zainduko du Aitor Ikastola, eta beronen luzapen izan daitezkeen erakundeak (gazteentzakoak, bereziki). Egiako Auzoan xede berekin ari diren edo sor daitezkeen elkarteei ere bere laguntza eskainiko die. |
| **Trebeska Kultur Elkartea** | 1976 | Egiara zuzendutako Elkartea da. Jatorriz euskal folklorea ezagutarazi, irakatsi eta zabaltzea zuen xedetzat, eta Xabier Elkartea izenarekin jaio zen. Orain bi hegal ditu: Xabier Mendi Taldea eta Trebeska Dantza Taldea. Atotxako Dorrean du egoitza. |
| **Klik Argazkilaritza Taldea** | 1992 | Arlo honetan Auzoak dituen premiak betetzea izan da Elkarte honen xedea. Egiako Gaztetxean egondako argazki-tailerrean legoke Elkarte honen lehen hazia. Erakusketak eta Auzoko bizitzari buruzko erreportaiak egin ohi ditu. Auzotar guztiei irekia dago taldea. |

JAI-AISIETARAKO ELKARTEAK

| | | |
|---|---|---|
| **Porrontxo Jai Batzordea** | 1982 | Urte horretan hasi ziren Auzoko Jai hauek ospatzen, eta zenbait tirabiraren ondoren, Jai Batzorde honek darama Egiako Jaien ardura. Porrontxoek Auzoaren nortasuna finkoagotzeko balio izan dute, eta egiatarren alde ludiko hori Auzoan bertan bideratu ahal izateko. Iraileko jaiok udaberriaz gero hasten dira prestatzen, eta jendetza handiak hartzen du parte bertan. Auzoko hainbat Elkartek parte harturik eratu zien lehenengo Porrontxoak. |
| **Ur-Zaleak** | 1935 | Auzoko gizonezkoen lagunarte gastronomikoa da, baina noizbehinka egin izan ditu bere kultur ekitaldiak ere. 1942-1992.etan Auzoko Madalena Jaiak antolatu zituen, eta Porrontxoen sortzean ere izan zuen eskurik. |

| | | |
|---|---|---|
| **Donosti Gain** | 1958 | Egiako gizonezkoen lagunarte gastronomikoa da hau ere. Kultur eta kirol ekitaldiak ere antolatu izan ditu (pilota, txirrindularitza, danborradan, etab.). |
| **Arrano Elkartea** | 1981 | Lagunarte gastronomikoa da berau, eta beste zenbait ekimen-motarekin bete du gizarteko topagune izateko xedea. Porrontxo Jaien sorreran ere izan zuen eskurik. |

KIROL ELKARTEAK

| | | |
|---|---|---|
| **Kostkas Kirol Elkartea** | 1967 | 50. hamarkadatik zetorren Elkartea sortzeko asmoa, hain zuzen lehendik futbolean aritu ohi zen talde batetik. Horrela, ba, talde honek Egiako futbolzaleak biltzen ditu. Ohiko futbol-entrenamendu eta partidekin batera, futbitoa ere zaintzen dute. Bizitza azkarreko Elkartea da. |
| **Xabier Mendi Elkartea** | 1976 | Mendi-taldea da, Trebeska dantza-elkartearen barnean. Rocodromo bat ere badute, eta mendizaleen kultura eta praktika sustatu nahi ditu, materialak eskuratzeko erraztasunak emanez, liburu eta argibideak luzatuz. |
| **Aikido Club Amagoia** | 1983 | Aikido, Kendo eta Iaido irakasten dira bertan: 70ren bat lagun ditu ikasleen artean. Lehia-borrokarik gabeko kirola nahi du sustatu, eta kirol horien bidez gogo-gorputzen arteko harmonia bilatzen da. |
| **Egiako Eskubaloi Elkartea** | 1995 | Egiako Polikiroldegian du egoitza. Auzokoen artean eskubaloia lantzea da honen xedea, lehiaketa ofizialetan ere parte hartuz. |
| **Mundaitz S. C. D.** | 1986 | Jesusen Bihoztarren Ikastetxeko taldea da hau. Kirol ezberdinen praktika (saskibaloia, eskubaloia, mendizaletasuna, hockey, xakea), taldean eta lehiaketa ofizialetan ere. Egiarako eta bertako ikastetxeekin batera lan egin izan du. |

| | | |
|---|---|---|
| **Egia Txirrindulari Elkartea** | 1988 | Martxotik irailera jaiero zikloturista-ibilaldiak antolatzen ditu, apurka-apurka ibilaldiak luzatuz, eta 150 km-ko bidaiak egiteraino. Bestelako lasterketarik edo ez dute antolatzen. Martin Santos Plazako Polikiroldegian du egoitza. |
| **Aitzarte Mendi Taldea** | 1968 | Mendizaletasuna bere alde guztietatik zaindu nahi du, eta auzotarrak mendira bultzatu. |

HERRI ETA EUSKARAREN ALDEKO ELKARTEAK

| | | |
|---|---|---|
| **Egiako Kriseilu Bagera** | — | Pare bat urte lehenago sortutako Kriseilu Elkartera bildu ziren Egian Donostiako Bageraren asmoak, betiere Egiako Auzoaren euskalduntzean jarduteko. Bertso-saioak, lagunarteko euskal afariak, bidaia kulturalak eta abar antolatu izan ditu. |
| **Egiako AEK Euskaltegia** | 1985 | Villa Salian du egoitza, Jai Alai auzunean. Euskaltegi honen historiaurrea aurreko urteetako Gau-Eskolan dago. 1985ean inskribatu zen HABE-ko erregistroan. Oro har, helduen euskalduntzea du xedetzat, eta zehazkiago Auzoaren euskalduntzea eta euskal kulturaratzea. Egun osoko jarduna eskaintzen du bere irakaskuntzan: 1999ko urrian 104 ikasle ditu (bakoitzak egunero bi orduko jarduna), eta 7 irakasle. |
| **Joxemi Zumalabe Fundazioa** | 1995 | Mundu ofizialetik at herri-herrian eta gizartean premia sozial jakinei erantzuteko sortu ohi diren mugimendu herritarrak laguntzea. Berorien lanerako baliabide teknikoak eta aholku berezituak ematea (legezkoak, harremanetarakoak, informatikoak, etab.). Mugimendu horiekiko azterlanak egitea, eta batasun lagungarriak sustatzea, denen arteko ezagumendua eta bateratze-bideak irekitzea, etab. |

NAZIOARTEKO HARREMAN ETA LAGUNTZETARAKO ELKARTEAK

| | | |
|---|---|---|
| **AIESEC** | — | "Asociación Internacional de Estudiantes de Ciencias Económicas y Empresariales". EUTG-en du egoitza. |
| **ESME** | — | ESTE-tik enpresetara joandako ikasle ohien elkartea da. |
| **Mugen Gainetik** | 1994 | Herri indigena eta gutxituei laguntzeko Elkartea; batez ere Ertamerikan ari da lanean (Guatemala, El Salvador, Nikaragua) eta Kuban. Hezkuntza eta ekoizpen proiektuak sustatzen ditu, eskolagintzaren bidez, nekazal egitarauekin (laborantza-hobekuntzak, basogintza, etab.). |
| **Mugarik gabe** | 1987 | Gaur egun indarrean den munduko sistema ekonomiko honek dakartzan desberdintasunen kritika, salakuntza eta berorien aurkako ekinbideak lantzea du xedetzat. Zenbait bizimoduren kritika sustatzea, Lehen Munduaren eta Hirugarrenaren arteko harreman desorekatuak zuzentzeko bideak bilatzea, denen arteko lankidetza elkartua bultzatuz; indarrean dauden munduko egituren salakuntza eta aldakuntza eztenkatzea. |
| **Ignacio Ellakuria** | 1997 | Bolondres sozialen elkartea, betiere gizartearen hoberako aldakuntzak bultzatuz: gizakiaren duintasunaren alde, herritarren eskubideen alde, pobrezia eta bazterkeriaren kontra, solidaritate-jarreren alde, gizabanako eta taldeen kontrako bidegabekeriak salatuz. |
| **Intered Euskal Herria** | 1996 | Egoitza Frantziako Etorbidean duen Elkarte hau Estatu mailako Intered erakundearen Euskal Herriko ordezkaritza da. Gobernuz Kanpoko Erakundea, Hego-Herriei laguntzeko sortua. Herrien garapenaz eta bolondresak prestatzeaz arduratzen da; gizarte-talde, herri eta kulturen arteko solidaritatea bultzatu nahi du. |

Zerrenda luze hau ikusi ondoren oharren bat edo beste egin daiteke, elkartasun hauek nolako Egia erakusten diguten azpimarratuz. Lehenik eta behin argi dago, Auzoa bizirik dagoela, eta premiak sentituz gero asmatzen duela auzotarrak elkarretaratzen. Bertako bizilagunen artean badago, hortaz, barne-solidaritaterik eta denen arteko interes bezala sentitzen den premiarik. Auzoko arazoak, ahal delarik, auzokoen artean eta bertatik bideratu behar direla uste duenik bada Egian, indar sozialak bilduz eta erakundeetara ere joanez.

## Bosgarren Partea

## Egiatarren hizkuntzak (1986-1996) - Las lenguas de los egiatarras

Desde la etapa pre-urbana del Barrio la población egiatarra fue vascohablante e incluso euskaldun monolingüe, y precisamente el viejo Convento franciscano de Txurrutal (situado en los solares del Depósito Municipal, junto al Apeadero del Gros) ofreció un caso ejemplar y pionero de atención escolar en euskera (siglo XVIII).

Principalmente los cambios demográficos, la transformación urbana, la evolución socio-cultural y los procedimientos administrativos y escolares que han incidido sobre Egia han contribuido eficazmente a la mutación sociolingüística del Barrio. Como en todas las grandes ciudades del País, también en Egia el castellano es la lengua hegemónica, pero el euskera no está en modo alguno ausente.

Se señalan las fuentes de información de que actualmente disponemos (1999), provenientes de estudios hechos sobre la base de encuestas, censos y padrones (Gobierno Vasco, 1981, 1995, 1999; SIADECO, 1986).

El campo sociolingüístico acotado por el Barrio es descrito en dos capítulos complementarios: uno, referido a un momento preciso (1986), y otro, en el que se atiende a los procesos de cambio operados al hilo de tres lustros (1981/1996).

El estado sociolingüístico de Egia (1986) es examinado sobre las capacidades de comprensión y habla del euskera en los hablantes de Egia, así como sobre las de lectura y escritura de los mismos. Se analiza también la relación que media entre las cuatro habilidades atendidas en la encuesta (comprensión, habla, lectura, escritura) en los vecinos del Barrio.

Una vez conocidos esos valores sociolingüísticos, se presenta un cuadro tipológico de hablantes que permite calificar la situación del Barrio y establecer cuadros sociolingüísticos comparativos de Egia con otros Barrios de la ciudad y con otros casos urbanos de Euskal Herria.

Como quiera que, tanto en el pasado como en el presente, las relaciones y predominios entre idiomas han sido y son variables, el estudio comparado de datos a distancia de 15 años (1981-1996), en una etapa de viraje en la política lingüística general, resulta de interés particular. A ello se consagra el capítulo final de esta quinta parte del artículo, examinando Egia, una vez más, en sí y en el contexto general donostiarra y en el de sus Barrios.

Egiako Auzoak, hemen ukituko dugun hizkuntzen arloari begira, bi hegaletarako aurpegi bikoitza izan du: garai bateko Auzoa osorik euskalduna izaki, alde batera Hiria zuen ondoan, hein batean behintzat eleanitza zena[1], eta, alderantziz, beste mugaldeetatik Auzo euskaldun elebakarrak zituen (San Martin, ibaiaz bestaldean, eta Ulia, Altza, Loiola, Urumearen eskuinaldean).

Baina garai haietatik hona, XIX. eta bereziki XX. mendeetan egoera hura arras aldatu da, hizkuntzei dagozkien hiztungoetan. Inoizko kaskoinera donostiarra aldendurik da jada, desagertua alegia; baina Hiriko Alde Zaharra eta auzune berri hedatuak hagitz erdaldundu dira (erdaldun elebakarrez bete, alegia) eta euskaldun zirenak eta berauen ondokoak elebidundu, gutxienez gaztelania ikasiz.

Halaz ere, inoiz baino euskaldun kanpotar gehiagok hartu du Egian bere bizilekua, Gipuzkoa, Nafarroa nahiz beste euskal Herrialdeetatik etorrita. Hizkuntzen eta hiztungoen aldetik, anbiguitate eta zalantzarik franko ageri da, ba, Egiako Auzoan, Donostia gehienean bezalatsu[2].

Azkenik, berrikitan (azken hamarkadetan, alegia), euskararen aldeko politika eta herritarren kontzientziak, izan dute eraginik bertako jatorri ezberdinetako biztanlegoan. Hau ere gogoan hartzeko datua da.

Honi guztiari begira, ba, Egiako euskal eskola historiko gutxi ezagun baten oroitzapena hona ekarri ondoren, eta gaur egungo hizkuntz egoera ezagutzeko albiste-iturriak gogorarazita, azken hamarkadetakoari helduko diogu liburuaren atal honetan.

* * *

## 1. Auzoko historiatik euskal lekuko gogoangarri bat

Betidaniko bere izaera euskaldunaz gain, Egiak badu bere iraganean, inon gutxitan topa dezakegun kultur gertakari euskalgile bat bere oroimen historikoan gordetzeko. Hortaz, gaur egungoari heldu aurretik, ez dugu hori ahantzita laga nahi hemen, Egiako hizkuntzei eskainiko diogun atal honetan.

---

1. MUGICA, S. (1928): "Los Gascones en Guipúzcoa", in: *Homenaje a Don Carmelo de Echegaray*. *(Miscelánea de estudios referentes al País Vasco)*. San Sebastián: Impr. de la Diputación. 1-29.

2. Historia horren argigarri, ik. K. IZAGIRRE (1998): *Euskararen historia txikia Donostian*. *1800-1998*. Donostia: Euskararen Udal Patronatua. Eta: *Argia*, 1998-azaroa-29 1694. z., 16-19.

Egia zen murruz kanpoko Auzo donostiar euskaldun haietako bat, eta Historiak adierazten digunez, garai bateko egiatarrak hain ziren nonbait euskaldun zerratuak, ze bertako fraide frantziskotarrekin bat eginda, auzotarrentzat Euskal Eskola bat sortu eta eratzea ere lortu zuten XVIII. mendean. Dakigunez, parekorik gabeko ahalegina izan zen hau garai haietan, Euskal Herri osoan ere.

Euskal Herriko Herri-Erakundeek, eta Elizak, oro har, ez zuten Euskal Eskolaren asmoarekiko hau funtsez eskutan hartu eta sustatu Aro Modernoan. Laffite-k gogorarazi zigun Joanes Leizarraga Artzain kalbindarrak (*Testamentu Berria* euskarara itzuli zuenak, 1571) eratu zuela bere etxean Euskal Herriko lehenengo eskola elebiduna, horrela gaur egungo Ikastolaren lehen aurrekari bilakatzen zelarik[3].

Euskara Eskolatik at uztearekin ados ez zegoenik, eta horren aurka hitz egin edo idatzitakorik, izan dugu Euskal Herrian, Eusko Pizkundearen aurretik ere (Ultzurrun nafarra, 1662; Kardaberaz gipuzkoarra, 1761; Ulibarri arabarra, 1820, etab.). Egiatarrak, eman nahi ziren urrats berri hauetatik zein hurbil zeuden jakiteko dakartzagu hona ondorengo datuok.

1761ean, Donostiako Hiriaren berri emez liburuxka bat idatzi zuen Joaquín Ordóñez elizgizonak. Bere garaian ez zen argitara eman, eta bi mende geroago kaleratu zuten, inprimatuta, eskuizkribu hura, 1963an[4]. Interes bizia du argitalpen honek, une jakin bateko Donostia bere osoan eta hainbat aldetatik ezagutzeko. Bertatik jasotzen dugu Egiari dagokion albiste hau[5]:

> *A pocos metros de la mar se halla el Convento de San Francisco del que también es patrona la Ciudad, [...] aquí se enseña la Escuela Bascongada y hay sermones en este idioma [...].*

Pasaeran emandako berri horrek, garai hartako ardura pedagogiko batera garamatza. Komentu horretan eskola-lanean Egiako fraideak egiten ari zirena (eskolak euskaraz ematea) Euskal Herriko herritar zenbaiten burutan zegoen zerbait zen, eta ez Auzo galdu bateko bitxikeria hutsa (nahiz eta, dirudienez, hemen beste lekutan egin nahi zenari aurrea hartuz ari ziren).

Hain zuzen, Ordoñez-ek hori Egiako komentuaz idazten zuen urte berean idatzi zen euskal literaturan sona aski izan duen beste liburuxka bat:

---

3. INTXAUSTI, J. (1995): “Leizarraga eta Leizarragatarrak (1563-1571), Erreforma-Kontrarreformetako ilun-argitan”, in: *RIEV*. XL, 1995, 158-159.

4. ORDOÑEZ, J. (1963 [1761]): *San Sebastián en 1761. Descripción de la ciudad, sus monumentos, usos y costumbres*. San Sebastián: Comité de Conmemoraciones Centenarias.

5. Ordóñez 1963: 28 (23. z. ).

*Euskeraren berri onak*. Iruñean agertu zen berau[6], eta hernaniar bat zen berorren egilea: Aita Agustin Kardaberaz josulaguna. Aita Kardaberaz bizibidez eta lanez maisua ez baizik besterik izan arren (hau da, elizgizona eta predikaria), ez zitzaion falta izan haur euskaldunen hezkuntzaz ardurarik. Euskal Eskola eskatuz ondoko testu hau idatzi zuen, erdal eskolako jokabideak Erret Goardiako Kapitain baten hitzez salatuz eta bestelako jokamolde hoberik erakutsitako "maisu famatu bat" (segur aski Etxeberri Sarakoa) eredutzat eskainiz[7]:

> *Nola euskal errietan, umeen aziera ona, ta bear dan Dotrinarik izango da, baldin euskera ondatzeko alegin guziak egiten badira, ta gure mutiltxo edo aurrai bildur, ta azoteakin, euskeraz itz egitea eragozten bazaie?*
>
> *Maisu famatu bat gure egunean izan zan, Latin gauzak ere Euskaraz erakusten zituena: ta Fratzes euskaldunai Gramatikako Erreglak euskaraz adirazi, ta erakusten dizkate. Ala ez Eskolan, ta ez Gramatikan euskara beñere utzi bear ez da.*

Urte-modu haietan eta geroxeago arazo hau zein bizirik zegoen, eta zein ardura minbera zen jakiteko Euskal Herriaren Adiskideen artean piztutako haserrea gogora daiteke, bestalde[8]. Adiskideetako denak ez zeuden ados, baina batzuek argi zeukaten eskolan euskarari lehentasuna eman beharra. Testuinguru hau honela izanik, ba, bere meritua dute Egiako Txurrutaleko fraideen jokabide pedagogikoak eta Egiako haurrekin bizi izandako esperientzia horrek, nahiz eta gertatutakoaz beste albiste zehatzik ez dugun (edo nik bederen ezagutzen ez dudan).

Auzoaren izaerari erantzun zion, noski, eskolatze-molde hark, eta euskal izaera horretxen lekuko dira iraganetik datozkigun eta gutxi-asko bizirik ditugun eta arestian ikusitako leku-izen ugariak ere. Egiako euskaltasun historikoak, ba, ziurtagiri garbiak ditu gurean.

## 2. Azken urteetako hizkuntz egoeraren albiste-iturriak

Donostiako euskaldungoaren (eta nahiago bada, hiztungoen) auzokako azterketa arian-arian bidea egiten ari da, 1986tik ona. Lehenik, urte hartako Erroldaren gain egin zuen bere lana Siadeco-k. Dakigunez, lana bere osoan argitaratzeke geratu zen, eta azterlanaren laburpen bat eskaini zitzaigun, Hiriko Auzoak ere aintzakotzat hartuz. Burutuz etorriko diren

---

6. CARDAVERAZ, A. (1761): *Eusqueraren berri onac, eta ondo escribitceco, ondo iracurteco, ta ondo itzeguiteco Erreglac*. Iruñea: Antonio Castilla.

7. Kardaberaz 1761: 17, 18.

8. INTXAUSTI, J. (1999): "Talde euskaltzaleen garapen historikoaz (XVI-XX. mendeak)", in: ID. (1998): *Hizkuntzaren aldeko mugimendu sozialak*. Bilbo: EHU. 42-47.

ondoko datu-bilketek eta azterlanek osatu beharko dituzte unean uneko egoera-deskribapenak ez ezik gertabidearen ikuspegi diakronikoa ere.

Hasteko, gogora ditzagun egoera soziolinguistikoaz ditugun oinarrizko bilketa orokorrak, horiei esker ezagut baititzakegu, orokorrean, euskararen errealitate soziala eta gure hizkuntzak erdarekin duen harremanmoldea. Hiru motatako datu-iturri dauzkagu Euskal Herriari (eta batez ere Hegoaldeari) dagozkionetan: Zentsuak, Udal Erroldak eta Inkesta orokorrak.

Behin datu-bilketa horiek eginez gero, bidea irekirik geratzen da ondoko azterlanetarako, Euskal Herri osoko nahiz herrialde bakoitzeko azterketa ezberdinak egiteko, edota eskualde, herri edo auzoetako analisiak hasteko. Hala ere, esan beharra dago iturri bakoitzak –Zentsu, Errolda nahiz Inkesta izan– bere baitan dituela muga jakin batzuk, bildutako datuen argibideak mugatuta datozelako (Zentsu eta Erroldetan,: galdeketak beti dira murritzak), eta Inkestak betiere inkesta direlako (egoera orokorrari buruz, zeharbidezko ezagumendua, beraz).

Dena den, hizkuntz politikak bidea egin ahala eta ikertzaileek metodologia finduz doazen neurrian, euskal mundua hobeki prestaturik dago gure gizarteko egoera soziolinguistiko aldakor horiek behatu eta atzemateko.

Hori horrela, azpimarratzekoa da Zentsu, Errolda edo Inkesta bakoitzak urrats berriak eman dituela, ez une berri bateko datuak bildu dituelako bakarrik, baita datu-bilketa berrian areagoko beste ezagutza-motaren batera zabaldu izan delako ere. 1981ean hizkuntz gaitasunaz ziharduen Zentsuak, gainerakorik gabe; baina 1986ko Erroldan besterik ere galdetzen zen, zentsu-erantzulearen ama-hizkuntzaz berriak eskatzean. Hortaz, 1986ko bilketako datuen bidez posible izan zen hizkuntz transmisioaz albisterik izatea, bildutako bi datuak gurutzatzean: ama-hizkuntzaren berria eta hizkuntz hartzaileak zuen euskararen ezagutza-maila. Horrela, ikertzaileek hizkuntz egoerak ez ezik hizkuntz prozesuak miatzeko aukera izan dute, handik hona, eta denbora pasa ahala, interes handiagoa izango du analisi-ahalegin horrek.

Gero, 1981eko ezagutza-datuari eta 1986ko transmisio-xehetasunei, bestelako informazioak gehitu zaizkie aipatutako datu-bilketetan. 1991ko Zentsuak familiakoen hizkuntz erregistroak bilatu zituen, aurreko bilketetako galderak baztertu gabe. Horrela Zentsu eta Erroldek, beren orokortasun betea gordez, hizkuntzaren bizitza sozialeko gune iraunkor eta emankorrenari heldu zioten, horixe izan baita sendia. Hortaz, belaunaldi artean hizkuntza pasarazteko tresna sozial erabakigarriena izan den familiaren berri jakin genezakeen.

Atzerapenen batekin izanik ere, 1991ko Zentsu hark ikerlan ofizial bat ekarri du orain: *II. Soziolinguistikazko Mapa* (1997ko datarekin agertua, eta 1999an aurkeztua)[9]. Bildutako datuei esker eta aurreko hamarkada osoko datuak ere eskueran daudelako, obra honetan, famili hizkuntzaren berri ematen zaigu, alde batetik, eta diakroniari helduz, hamarkada horretan zehar (1981-1991) gertatutako aldakuntzen notizia eskaintzen digu berak; aldi berean, lehenengo aldiz heldu zaio 10.000 biztanletik gorako herrietako auzoen hizkuntz egoera eta prozesua aztertzeari.

Guztiaren ondorioz, erabateko azterlan zehatzak egin gabe dauden arren, auzo horietako bakoitzak argitara emanda ditu funtsezko datuak bederen, eta berorietaz baliatuko gara hemen Egiako hizkuntz egoera eta aldaketa-prozesuaz hitz egiteko.

Azkenik, esatekoa da, Zentsuak edo Erroldak ez bezala (hauek beti baitira hizkuntzarekiko galderatan oso mugatuak), Inkestak askatasun handiz presta ditzaketela beren galde-zerrendak. Erraztasun horri esker, beste datu bilketa horietan ezagutza, trasmisio edo familiara mugatu zena, 1991ko I. Inkestan gizarteko hizkuntzaren beste erabilpenetara, herritarren hizkuntz jarrera edo interesera, jatorri geografiko edo kulturalera ere hedatu da. Espero daiteke jada abian omen den II. Inkestak ez duela galduko bere galdeketan zabaltasun hori, eta nork daki, beharbada are zabalago ere jardungo duela.

Informazio-altxor handiak dira Zentsu, Errolda eta Inkesten bidez sortutako datu-base horiek, eta Erakunde ofizialen eta ikertzaileen esku dago geroztik, bildutakoaz baliaturik, ikaslan osagarriak egitea. Egiako Auzoaz ari garela, gu geure aldetik, saiatuko gara ondoko orrialdeetan, batez ere eskueran ditugun datuen berri ematen eta langai horietan ikusi uste duguna azaltzen.

Aurrera baino lehen, aitzin-ohar bezala iturriei buruz esandako hauek lauki batean aurkeztuko dizkiogu irakurleari, ondoko orrialdeetako zenbakien basoan gal ez dadin. Iturri ofizial bakoitza aipatuko dugu, lehenik, hizkuntzazko albisteak zertaz diharduten adieraziko da gero, iturri bakoitzaz ditugun lan zabal erosoenak gogoratuko dira hirugarren zutabean, eta, azkenik, gure auzoez zerbait badagoen ala ez esango da.

---

9. KULTURA SAILA (1997): *II. Soziolinguistikazko Mapa*. Vitoria-Gasteiz: Eusko Jaurlaritza.

## ITURRI SOZIOLINGUISTIKO NAGUSIAK (1981-1996)

| *Iturria* | *Galdegaiak* | *Azterlanak* | *Auzoa?* |
|---|---|---|---|
| **1981eko Zentsua** | Lau ezagutzak:<br>• ulermena<br>• mintzamena<br>• irakurmena<br>• idazmena | Ondoko urteetako lanetan, azterlan diakronikoetarako erabili izan dira 1981eko datuak: ik., adibidez, *II. Soziolinguistikazko Mapa* (1. liburukia).<br>SIADECO (1986): *Azterketa soziolinguistikoaren laburpena*. Auzoka emanda dago ezagutzarena. Oro har, 1981-1986. urteak bildu zituen, 1981eko Zentsuari 1985eko inkesta baten emaitzak gehituz, erabilpen-jarrerei zegozkionetan. Ik. lan nagusia ere:<br>SIADEKO (1986): *Azterketa soziolinguistikoa [Donostiaz]*. Donostia: Euskararen U-dal Patronatua. (Argitaragabe). | Bai |
| **1986ko Errolda** | Lau ezagutzak (*ut supra*).<br>Ama-hizkuntza: transmisioa. | JAURLARITZA (1989): *[I.] Soziolinguistikazko Mapa*. Gasteiz. | Bai |
| **1991ko Zentsua** | Lau ezagutzak (*ut supra*).<br>Ama-hizkuntza: transmisioa.<br>Familiakideen erregistroak. | JAURLARITZA (1997): *II. Soziolinguistikazko Mapa*. Gasteiz. Esandakoez gain:<br><br>• Azterk. diakronikoa (1981-91).<br>• Auzokako azterketa. | Bai |
| **1991ko**<br><br>**I.Inkesta** | Lau ezagutzak (*ut supra*).<br>Trasmisioa.<br>Trasmisio-faktoreak.<br>Gizarteko erabilerak.<br>Hizkuntz jarrera, interesa.<br>Hiztunen jatorria.<br>Hiztunen kultur identitate. | JAURLARITZA (1995): *Euskararen jarraipena*. Gasteiz. | Ez |
| **1996ko Errolda** | Aurreko Errolda eta Zentsuei segida kronologikoa eman die | *II. Soziolinguistikazko Mapa*-ko 3. liburukia Errolda honetaz baliatzen da, auzoetako albiste labur batzuk ere bilduz; baina 2. liburukian datozen *Hedapen* disketeetan aurki daiteke 1981-1996.etako datu ofizial ugari. | Bai |
| **1999ko II.Inkesta** | (Hau idaztean, egiteko dago) | | |

Iturri hauen gain, eta tarteko diren azterlan aipatu eta aipatugabeen bidez, landuko dira Egiari buruz ondoko orrialdeetan ikusiko ditugunak, betiere euskal hiri eta herrietarako markatu diren galdera-esparruetan.

### 3. Auzoko euskal-erdaltasunak, 1986ko Erroldaren arabera

Euskal Herriko eskualderik euskaldunenetan ere, zenbait hamarkadatatik hona euskararen arazoa hizkuntzen arteko ukipen-egoera batean ageri zaigu. Erdi-tamainako herrietan, eta zer esanik ez hiriburuetan, ukipen-egoera hori are kontrakoagoa du euskarak gure gizartean.

Eta hiriburu horietan etorkinen bizileku diren Auzoetan, erdara kasik erabat nagusitu izan da bertako hiztungoen arteko harremanetan. Egiako Auzoa ez da urrun egon egoera desorekatu horretatik.

Esan dugunez, bost urte lehenago 1981eko Zentsuak emandako datuez gain (orduan hizkuntz gaitasun edo ezagutza laukoitza zen galdegai bakarra), ama-hizkuntzarekiko galdegaia gehitu zuen 1986ko Erroldak (eta, hortaz, zeharbidez, transmisioarena ere ezagutzeko bidean jarri gintuen).

1986ko Erroldaren aurretik, Hiriko Euskararen Udal Patronatuak azterketa handi bat jarri zuen abian, Donostiako euskararen egoera ezagutzeko asmoz. Siadeco iker-taldeak eraman zuen lan hori aurrera, eta bi zutaberen gain eraiki lana: 1981eko Zentsuaren eta lana burutzeko egindako inkesta baten gain, alegia. Bigarren azterbide honek, lanaren eremua guztiz zabaldu zuen: inkestak posible egin zuen, ezagutzarena baztertu gabe, bestelako galderak egitea ere (erabilpenaz, etxeko-hizkuntzaz, gizarteko zerbitzuenaz, etab.)[10].

Siadeco-ren lan hau da Donostiako euskarari buruz sekula egin den lanik aberatsena. Eman zuen argitara Patronatuak berorren laburpena, 1986eko hondarretan, baina horren sostengua zen lan handia ez da kalean jarri sekula. Azterlan hau izan zitekeen guretzat informazio-iturririk erosoena, baina, denon zoritxarrerako, ikerlanak Donostia eremu gutxi batzutan banatzea aholkatu zion ikertzaileari, eta Siadeco-ren honetan ageri den "Egia" ez da guk hemen gogoan duguna, askoz ere esparru zabalago bat baizik, Egia-Marrutxipi eta Loiola-Martutene ere hartzen dituena. Horrela, horko datuak ez zaizkigu guri erabilgarriak gertatzen. Berriz ere Zentsuak eta Erroldak izango ditugu, ba, gure bide-lagungarri.

1986ari dagokion kapitulu honetan, Erroldak eskaintzen diguna aurkeztuko dugu, hizkuntz ezagutzari dagokionean informazioa bi gisatan emanez: a) Biztanlegoaren analisia adin-multzoka eratuz, eta b) Biztanleak hizkuntz tipologia baten arabera begiratuz. Azterbide bakoitzak du bere interesa, berehala ikusiko dugunez.

---

10. SIADECO (1986): *Donostiako azterketa soziolinguistikoa*. I. *Euskararen ezagupidemaila 1981eko Erroldaren* [sic] *arabera*. II. *Euskararen presentzia bizitza sozialean*. III. *Inkesta pertsonalaren emaitzak*. IV. *Eranskin estatistikoa*. (Esan bezala, bere osoan argitaragabeko ikerlana da). Egia-Marrutxipi eta Loiola-Martuteneri buruzko datuak: I, 60, 61. or.; II, 70, 73. or.; III, 41-77.

### *3.1. Uler-mintzamenak, eta irakur-idazmenak*

*Adinezko azterketan* bi kontzeptu bikoitz har ditzakegu, miaketarako: 1) Euskara ulertu/mintzatuarena, eta 2) Euskara irakurri/idatziarena. Hark hizkuntzaren funtsezko eta ohiko izaera soziala ispilatzen du, eta honek, ostera, mintzairaren idatzitasunak dakarkeen kultur maila berria. Bakoitzak bere informazio moldea du, eta elkarren arteko balio osagarria dute.

#### *3.1.1. Euskarazko ulermen-mintzamenak (1986)*

Adin-multzokako analisira gatozela, bi lauki nagusiren bidez ekarriko dugu hona Egiako euskalduntasunari buruz jakin dezakeguna. Hona lehenengo datuak bilduta:

**Donostiako Egiako Auzoa (1986)**

EUSKARA ULERTU/MINTZATUEN GAITASUNAK, ADINAREN ARABERA[11]

| *Adin-multzoa* | *Biztanl.* | *Euskara ulertu (%)* | | | *Euskara mintzatu (%)* | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|
| | | *Deus ez* | *Zerbait* | *Ongi* | *Deus ez* | *Zerbait* | *Ongi* |
| **1.** 2/4 urtekoak | 331 | 43 | 22 | 35 | 48 | 22 | 30 |
| **2.** 5/9 urtekoak | 787 | 37 | 30 | 33 | 41 | 28 | 31 |
| **3.** 10/14 urtekoak | 1.205 | 31 | 42 | 27 | 35 | 40 | 25 |
| **4.** 15/19 urtekoak | 1.347 | 36 | 37 | 27 | 40 | 39 | 21 |
| **5.** 20/29 urtekoak | 2.564 | 55 | 22 | 23 | 58 | 22 | 20 |
| **6.** 30/39 urtekoak | 1.682 | 62 | 16 | 22 | 66 | 16 | 18 |
| **7.** 40/59 urtekoak | 4.194 | 70 | 10 | 20 | 73 | 10 | 17 |
| **8.** 60… urtekoak | 3.131 | 68 | 7 | 25 | 70 | 7 | 23 |

Hemen ageri zaizkigun ehunekoak, beren indarrean eta testuinguruan ulertzeko, lehen ohar bat behar-beharrezkoa iruditzen zaigu: 1986ko Erroldaz ari gara baliatzen, hau da, Irakaskuntzan elebitasuna ezarri zenetik zazpi urte bete ziren urteko datuak ditugu informazio-iturri horretan[12]. Urte haietan izandako bilakaeraren berri jakiteko argibideak eskura daude, ba, hor[13].

---

11. 1986ko Udal Errolda: "Población mayor de un año según conocimiento del euskera, edad y sexo [por Barrios: Egia]".

12. Euskal eskolagintza horren eta Irakaskuntzak izan duen elebitasunaren ibilera ezagutzeko, hona Mikel Zalbide-ren gidaritzapean buruturiko azterlana: EUSKARA ZERBITZUA (1990): *Euskal Irakaskuntza: Hamar urte. 1979-80 / 1989-90*. Vitoria-Gasteiz: Eusko Jaurlaritza.

13. Lauki estatistiko egoki bat, eta horren azalpen grafikoak: Euskara Zerbitzua 1990: 23-25. – Gogoan izan lauki honetan bi urtetik gorako haurrak hartzen direla bakarrik aintzakotzat.

Egiako ehunekoen gure lauki horretara itzuliz, iruzkin zenbait eman nahi dugu hemen, adin-multzoz multzo. Iruzkin hauek datu finko jakin bat begi bistatik galdu gabe ulertu behar dira: adin-multzo guztiak une berekoak dira, eta batera osatzen dute 1986ko lauki osoa. Ordurako euskal eskolak ukituta zituen lehen adin-multzoak (1-2-3), baina ezer gutxi edo deus ez ondoko taldeak (4-5-6-7-8). Azken hauek "eregimen zaharrekoak" gertatzen direla esan daiteke, hau da, euskal eskola elebidunak ukitu gabeak.

1986ko kasu honetan, ez da, derrigor, urtetan aurrera egin ahala euskara utzi egiten dela, baizik eta, batez ere, gazteak harrapatu dituen eskola-olatu euskaldunak (1979…) ez dituela aski edo era berean adin-multzo zaharragoak ukitu. Horregatik ere, une jakin hartako egoera (1986) honela ageri zaigu:

– *Euskarazko ulermenaz:*

1) *Lehenengo multzoan* (2-4 urteko haurrak) ikusten denez, % 43 bakarrik da Egian euskara deus ulertzen ez duena (hau da, alderantziz esanda, Egiako haur erdaldun hutsa).

   Uste dugunez, haurtzaindegi euskaldunek, edo elebidunek, eta agian heinen batean euskal TBk egin dute hor lan, zenbait haurri euskarara hurbiltzen lagunduz. Pentsa daiteke gurasoen jarrera eta jokabide euskaltzaleak edo daudela tartean: euskara gutxi dakienak ere haurrarekin euskaraz egiten du. Gauza bera esan daiteke haur horien mintzamenari buruz.

   Familia euskaldun eta erdi-euskaldunek (biztanletan orotara % 42 direnek) hobetu egiten dute lehen urte horietan beren haurrengan hizkuntz gaitasuna, zalantzarik gabe gurasoen hizkuntz jarreraren eraginez eta, uste daitekeenez, eskolaz ere baliatuz, haurretako %57k (22 + 35) euskara zerbait edo ongi jakiteraino; guraso ez-euskaldunetatik ere badatoz, itxura guztiz, portzentaia gorantz bultzatzen duten haurrak.

2) *Bigarren adin-multzora* gatozela (5/9 urtetakoak), nabaria da euskararen aldeko bilakaera: aurreko multzoarekin alderatuz, deus ez dakitenen multzoak behera egin du (lehenengoan, % 43 zen lekuan, orain % 37 daukagu), eta alderantziz: zerbait dakitenen ehunekoa gora doa (aurrekoan % 22, eta 5/9 urteko multzo honetan, ostera, % 30 da zerbait dakiena). Horrek ez du esan nahi, ordea, hizkuntz jabetasun-kalitateei berdin lagundu zaienik: ongi zekitenak % 35 ziren aurreko adin-multzoan, eta bigarren honetan, berriz, % 33ra jaitsi da portzentaia.

3) *Hirugarren adin-multzoan* (10/14 urtetakoan) muga nabari batekin topo egiten dugu. Alde batetik, ehunekotan egoerarik euskaldunena da multzo honetakoa: deus ez dakitenen ehuneko baxuena du; baina, aldi berean, "ongi" saila gora egin ordez, beherantz hasten da. Hau da: urte hauetakoen artean ezagutzak ez du lortzen behar adinako fermutasunik bere kalitatean. Badirudi, horrez gero, Eskolak eman dituela onenak (agian, artean eskolako egoera elebiduna ongi finkatu gabe zegoelako?), baina 1986an atzetik zetozenen ("deus ez" + "zerbait") euskalduntasun osoa segurtatu gabe, eta "ongi" ulertzen zutenen ehunekoak bermatzeke (aurreko multzoko % 33a % 27 erortzen baita).

4) *Laugarren adin-multzoan* (15/19 urtetakoan), hirugarrenean barruntatutako joerak berretsi eginen dira: urte hauetatik aurrera, "deus ez" edo "zerbait" dakitenak euskaratik urruntzen hasten dira, hurrengo adin-multzo guztietako ehunekoak erdaldun-elebakarragotuz. Euskara deus ulertzen ez dutenak, haur-haurtzaroko portzentaia eskasenera itzultzeko bidean dira, % 36raino igoz; "zerbait" dakitenek ere, aurreko adin-multzo guztietan gora egin ondoren, beheranzko joera erakusten dute beren portzentaian: aurrekoan % 42 zena, orain % 37ra erortzen da. "Ongi" dakitenen multzoak bakarrik eusten dio bereari: % 27. Hemen ere, artean (1986), eskolatze elebidunik ez izana edo eskolatze euskaldunak zuen ahulezia egon litezke tarteko. Dena den, ondoko adin-multzoetan (eta hiru ezagutza-kategorietan berdintsu) ehunekoen beherakada nabaria izango da, adin-multzo honetatik hasita.

5) *Bosgarren adin-multzoarekin* (20-29 urtetakoak) hizkuntz egoera sozial zahar baten munduan sartzen gara: erdaltasunak jauzi handi bat ematen du hemen. Deus ez dakitenak ia hogei puntu irabazten ditu, % 36tik % 55eraino igaroz, eta bigarren hizkuntza kategorian, galera-zentzu berari jarraiki, "zerbait" dakitenak %37tik %22raino jaisten dira, eta ongi zekiten % 27 haiek ere % 23ra datoz. Laugarren multzoan ageri dena, guztiz berretsita geratzen zaigu, ba, bosgarren honetan. Hurrengo pausuek norabide bera izango dute.

6) *Seigarren adin-multzoan* (30/39 urtetakoetan) beste jauzi larri bat eman du erdaltasunak, "ongi" dakitenek bereari nahikoa ondo eusten dioten bitartean (puntu baten galera bakarrik). Deus ez dakitenak % 62 igotzen dira adin-multzo honetan, eta "zerbait" dakitenek oraindik ere beherago egiten dute, % 16ra etorriz.

7) *Zazpigarren adin-multzoa* (40/59 urtetakoa) da, aipatzen dugun urtean (1986), Egiako guztietan erdaldunena: deus ez dakitenek %

70eko sabaia joko dute hemen, eta "zerbait" dakitenak, ostera, % 10 dira bakarrik, azken portzentaia honekin orain arteko beste adin-multzo guztien azpitik. "Ongi" ulertzen dutenak multzo honetan dute punturik baxuena, % 20.

8) *Zortzigarren adin-multzoan* (60 urtetik gorakoak) oihartzun zaharragoak ageri zaizkigu: euskara deus ulertzen ez dutenak ia punturik altuenean daude (% 68), baina "ongi" dakitenak zerbait indarberritu egiten dira (aurreko adin-multzoko % 20tik % 25era pasatuz). Badirudi etorkin erdaldunak (euskalduntzeak gutxien ukitutakoak) eta jatorrizko tokiko euskaldun zaharrak daudela aurrez aurre, eta tartean, noraezean edo, talde ttipi bat ("zerbait" konprenitzen dutenak: % 7).

   Hau da adinez adin begiraturik Egian 1986an genuen hizkuntz egoera. Baina, esan denaz gain, goiko lauki horrek beste irakurbiderik ere izan dezake, eta berorri helduko diogu orain.

Euskara-ulermenarena goitik behera berorretan ditugun hiru ezagutza-kategoriak beregainki miatuz, begira dezakegu laukia.

a) *Deus ulertzen ez dutenak*. Lehen haurtzaroan (2/14 urteetan), honelakoen portzentaia goitik behera dator, hasieran egoera orokor erdaldun indartsua islatuz, eta ondoren, gizarteko hizkuntz transmisio instituzionalen eragina jasoz. Baina, hortik ondorengo adin-multzoetan, deus ulertzen ez dutenen ehunekoek gora egingo dute, gupidarik gabe, azken unean (60 urtetik gorakoetan) bere portzentaia balaztatuz.

b) *Zerbait ulertzen dutenak*. "Zerbait" horrek dituen iluntasunari ongi erreparatuz gero, zera esan daiteke: Haurtzaroan nabarmen egiten du gora portzentaia honek (%22tik % 42raino). Eskola dago tartean noski, eta zaila da zerbait bederen ez ulertzea, eta 20 urteko mugaraino edo poliki eusten zaio irabazitakoari (% 37), baina hortik aurrera, zerbait dakitenak hurrengo adin-multzoetan portzentaia txikiagoa izango dira, hutsaren hurrengo bilakatzeraino (60 urtekoen artean % 7,60). Zerbait dakitenen talde hau finkotasunik gabea da: erdaldunetara lerratzen da erraz.

c) *Ongi ulertzen dutenak.* Egiako euskaldunen taldea, hein batean, aski finkoa ageri zaigu. Hori bai (ez da ahantzi behar Erroldak darabilen "ongi" kalitate-txartelarekin gabiltzala), lehen haurhamarkada eta laurdenean galera-jauzi bat jasaten du (zaila da, nonbait, Donostian euskararen jabetasuna "ona" izatea), % 35etik % 27ra eroriz. Hortik aurrera, ordea, bereari poliki eutsiko dio taldeak adin-multzoz multzo (23, 22, 20, 25).

Hauxe da, ba, euskararen ulerpenaz esan dezakeguna. Zer dago, ordea, egiatarrek mintzatzeko omen duten gaitasunaz.

– *Euskarazko mintzamenaz*

Oro har, pentsa daiteke hiztunen mintzamena ulermenaren atzetik joango dela, hizkuntz pasibotasunetik mintzatze aktibora dagoen aldeagatik. Eta, gertatu ere, halaxe gertatzen zaie egiatarrei, eta mintzamen-ehunekoak ulermen hutsari dagozkionetatik erdararen alde hazi egiten dira, eta euskararen kontra apalagotu. Mintzatzeak dakarren zailtasun gaineratua ageri da ehunekoetan.

Esan dezagun, orokorrean, ulermena eta mintzamena alderatuz gero, gaztelaniaren aldeko datuak hobetu egiten direla mintzamenari dagozkion laukian: hasteko, euskara deus ez dakitenak, gaztelaniaz ari dira, noski; zerbait mintza daitezkeenak ia beti euskara zerbait ulertzen dutenak baino gutxiago dira, eta euskaraz ongi hitz egiten dutenak beti dira gutxienez pare bat puntu gutxiago.

Zutabeetako hiru zifra parekideen (hau da, adin berdineko hiru gaitasun-mailen) aldi bereko irakurketa ulermen-datuez egin dugun iruzkineko zortzi puntuetan bezala egin daiteke. Ez dugu, ba, gauza bertsua errepikatuko.

Ikus dezagun, laburki, osagarri bezala, mintzamenean egiatarren gaitasun-kategoriak adin-multzoz multzo nola doazen, zutabeetan goitik behera behatuz.

a) *Deus mintzatzen ez direnak*. Egiako ia biztanle-erdiak (bi urtetik gorakoak, noski) lehen urteetan ez dira batere gai euskaraz mintzatzeko eta erdaraz bakarrik ari dira (% 48). Euskararen aldetik begiratuta, egoera hori zerbait samurtu egiten da haurtzaroan (10/14 urtetakoen artean erdaldun hutsak %35 izateraino), baina berriro gora egiten du ehunekoak, eta larriagotu ere egiten da, bizkor, ehuneko horretatik 20/29 urtetakoen artean % 58 izateraino. Ondokoak egoera areago eramaten du, 40/59.urtetakoetan % 73raino eramanez. Hortaz, erdaldun hutsen taldea, mintzamenaren aldetik, guztiz gogortua eta elebakartua da.

b) *Zerbait mintzatzen direnak*. Talde honek, adinez adin doala, juxtu aurrekoaren kontrako ibilbidea egiten du: Ehuneko nahiko apal batetik hasi (% 22) eta % 40raino iritsi ondoren (10/14 urtetakoen taldean), % 7ra erortzen da (60 urtetatik gorakoen artean). 1986ko argazki finko honetan, badago lehen multzoetako igoera itxaropentsu hura, 1986an ondokoetan gora-segidarik ikusten ez zitzaiona (artean goizegi zen), baina, agian, 14 urtetatik aurrerako baldintzak aldatuz gero gaztedi berriak ondoko urteetan gaindi

zezakeena (hipotesi hau ondoko Errolda eta Zentsuek frogatu beharko dute).

c) *Ongi mintzatzen direnak.* Euskal mintzatzaile zinez gaituek ("ongi" hitz egiten dutenek) talde erlatibo ziurra osatzen dute, % 20aren inguruetan edo, multzoz multzo. Baina, datu horren ondoan, azpimarratzekoa da lehen haurtzaroan gorakada bat badu horrek, ondoko multzoetan segurtatzen ez dena, hain zuzen lehenagotik egon ez zen euskal eskolatzeak euskalduntasun-portzentaiak bermatu ez zituelako (ez dezagun ahantz ez gabiltzala segidatasun kronologiko pertsonala duten datuekin, elkarren ondoan dauden adin-multzo ezberdinekin baizik).

### *3.1.2. Euskarazko irakurmen-idazmenak (1986)*

Ondoko datuen esanahi erlatiboa nahiz balio objektiboa neurtzeko –berriz ere gogoraraziko diogu irakurleari– gogoan har dezagun Erroldak, honelako inkestetan besterik ezinean, hiztunek bere buruaz duten ikusmoldea ematen digula, eta datuok ez direla, beraz, guztientzako neurketa definitu eta arautu bakar baten arabera bildutakoak.

Hala ere, Erroldak dira gizarte baten azterketarako dauzkagun tresnarik unibertsalenak, eta aztergai diren herritar banako guztiengana iristen diren lanabes zabalenak. Horregatik, Erroldan hizkuntz egoerari eta hiztunen iritziei buruz emandako erantzunak balio orokor handia dute, inondik ere.

Arestian euskararen ulermenari edo mintzamenari buruz esandakoen ondoan, Egiako hiztunen (euskaldun nahiz erdaldun izan) euskal irakurmena eta idazmena ezagutzeak interes kultural eta sozial argia du, kultura idatziarekiko gaitasun eta trebeziaren neurria ematen digulako (Errolda erantzulearen uste-galbahetik pasata, esan den bezala).

Honetan, euskararen egoera gutxitua nolakoa den jakiteko, ongi etorriko zaio irakurleari egiatarren artean, eta Donostian, edozein hizkuntzatako alfabetatugabeez 1975eko eta 1986 Erroldetan esaten zaigunarekin hemengoa alderatzea. Izan ere, lekutan dago euskaldungoaren egoera, nahiz eta hemen hiztunak berak esanak osorik sinetsi!

Goian euskararen ulermenari eta mintzamenari eskaini diogun laukiaren parean, beste hau da egiatarren euskal irakurmena eta idazmena deskribatzen dizkiguna:

**Donostiako Egia Auzoa**

EUSKARA IRAKURRI/IDATZIEN GAITASUNAK, ADINAREN ARABERA (1986)[14]

| *Adin-multzoa* | *Biztanl.* | *Euskara irakurri (%)* | | | *Euskara idatzi (%)* | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|
| | | *Deus ez* | *Zerbait* | *Ongi* | *Deus ez* | *Zerbait* | *Ongi* |
| **1**. 2/4 urtekoak | 331 | 92 | 6 | 2 | 93 | 5 | 2 |
| **2**. 5/9 urtekoak | 787 | 54 | 23 | 23 | 55 | 23 | 22 |
| **3**. 10/14 urtekoak | 1.205 | 40 | 37 | 23 | 40 | 37 | 23 |
| **4**. 15/19 urtekoak | 1.347 | 44 | 36 | 20 | 45 | 36 | 19 |
| **5**. 20/29 urtekoak | 2.564 | 62 | 20 | 18 | 63 | 20 | 17 |
| **6**. 30/39 urtekoak | 1.682 | 70 | 14 | 16 | 72 | 14 | 14 |
| **7**. 40/59 urtekoak | 4.194 | 77 | 9 | 14 | 80 | 9 | 11 |
| **8**. 60… urtekoak | 3.131 | 75 | 8 | 17 | 78 | 8 | 14 |

Esan dugu: Irakurmenari eta idazmenari dagozkien portzentaien kideko zutabeak elkarren oso paretsuan doaz, eta idazlea irakurlearen atzetik joan ohi da; hau da, “deus ez”, “zerbait” bai edo “ongi” idazten dutenak adin-multzo eta gaitasun-maila bereko irakurleen atzetik joan ohi dira ehunekoetan. Adibidez, 2/4 urtetakoen artean gutxiagok daki euskara idazten (% 93) irakurtzen baino (% 92), edo gehiago dira zerbait irakurtzen dakitenak (% 6), idazten dakitenak baino (% 5).

Dena den, azken kasu hau izan ezik, zerbait dakitenen bi zutabeetako portzentaiak berdinak dira adin-multzo guztietan, “zerbait” irakurle eta idazle direnen artean. “Ongi” ari direnen artean, ostera, irakurtzen/idazten bi puntutarainoko aldea egon daiteke, adin-multzoren batean (aldera bi “ongi” zutabeak).

Funtsean, lauki honetako daturik lazgarriena “deus ez”-ari dagokiona da: %92rekin hasitako zutabea, % 75ekin bukatzen da, tartean kasurik onenean eta adin-multzo bakar batean (10/14 urtetakoa) % 40ko alfabetatugabeko kopurua duelarik (onena izan arren, izugarrizko kopuru altu hori duela esan nahi dut). Bizitza modernoan ez dago horrelako portzentaia larriak izanda, biziera sozial itxurosoa duen edo eraman dezakeen hizkuntzarik.

14. 1986ko Udal Errolda: “Población mayor de un año según conocimiento del euskera, edad y sexo [por Barrios: Egia]”. Datuen gain, geuk landutako laukia.

### *3.3. Lau gaitasunen alderatzea*

Lau gaitasunen laukietako datuak alderatzen badira, begiragarririk frango idoroko dugu, gaitasunen ehunekoak nola aldatzen zaizkigun ikustekoa baita. Era berean, hau da unea, Egian dugun hizkuntz gaitasuna bere kopuru absolutuetan ezagutzeko, portzentaiek duten erlatibotasunaren ondoan, ongi baitago zenbateko errealitate mukurra dugun jakitea ere.

#### *3.3.1. Adin-multzokako ehunekoak*

Irakurmen/idazmenen lauki hau aurrekoarekin (ulermen/mintzamenei dagokienarekin) alderatzen baldin badugu, badago zer miaturik Egiako hiztungoan. Jauzi handia edo nabaria dago beti ulermen-mintzamenen eta irakurmen-idazmenen artean, adibidez lehen adin-multzoan, hirugarrenean eta zazpigarrenean:

EGIATARREN HIZKUNTZ GAITASUN EZBERDINEN ALDERAKETA, ADIN-MULTZOKA (%) (1986)[15]

| *Gaitasuna* | *2/4 urtekoak* | | *10/14 urtekoak* | | *40/59 urtekoak* | |
|---|---|---|---|---|---|---|
| | *Deus ez* | *Ongi* | *Deus ez* | *Ongi* | *Deus ez* | *Ongi* |
| Ulermena | 43 | 35 | 31 | 27 | 70 | 20 |
| Mintzamena | 48 | 30 | 35 | 25 | 73 | 17 |
| Irakurmena | 92 | 2 | 40 | 23 | 77 | 14 |
| Idazmena | 93 | 2 | 40 | 23 | 80 | 11 |

Zutabeetan, “deus ez”-ak goitik behera begiratzen baldin baditugu (hau da, gaitasun errazenetik zailenera pasatuz) eta hiru zutabeak elkarrekin alderatu, zera ikusiko dugu: aukeratu ditugun adin-multzoetan handituz doazela kopuruak haurretatik adinekoetara (1986ko urtean gaude: hortaz, aldi bereko balioak dira portzentaia horiek).

“Ongi” zutabeei so egiten baldin badiegu, gisa berean (baina zifrak larrienetik txikienera doazela), gero eta gutxiago dira gaitasun berrietara pasatzen direnak adin-multzo bakoitzean, nabarmenki lehen multzoan (normala da 2/4 urte izanik); hurrengo adin-multzoan daukagu orekarik berdinduena, “ongi” erantzuten dutenen artean (hortaz, lau gaitasunak pare-

15. 1986ko Udal Errolda: “Población mayor de un año según conocimiento del euskera, edad y sexo [por Barrios: Egia]”. Datuen gain, geuk landutako laukia. Portzentaiak dira laukian dauden zifrak.

tsuan dabiltza, 10/14 urtekoetan). Zaharrenetan (40/59 urtekoetan), "ongi" ari direnetan, portzentaia apalagoak ikusten ditugu aurreko adin-multzoan baino, eta gaitasun-maila ezberdinetan aski behera egiten dute portzentaiek (% 20k ulertzen du, baina % 11k bakarrik idazten).

### *3.3.2. Gaitasun-zifra absolutuak, eta Auzo-arteko alderaketa*

Lau gaitasun horiek horrela, ehunekoetan eta adin-multzo hautatu batzuetarako, horrela deskribatu ondoren, galde daiteke Egian zein hiztun-kopuru absolutu dagoen hizkuntz gaitasun-maila bakoitzean. Zenbat dira Auzoan, 1986ko Erroldaren arabera, euskara ulertu, mintzatu, irakurri edo idazten dutenak. Jada ikusi ditugun portzentaiek atzetik zein hiztun-kopuru absolutu dituzten jakiteko balioko digu ondoko laukiak:

EGIAKO HIZKUNTZ GAITASUNAK: KOPURU ABSOLUTUAK (1986)[16]

| *Ezagutza* | *Ulertu* | *Mintzatu* | *Irakurri* | *Idatzi* |
|---|---|---|---|---|
| Deus ez | 8.790 | 9.301 | 10.170 | 10.469 |
| Zerbait | 2.824 | 2.775 | 2.513 | 2.496 |
| Ongi | 3.626 | 3.164 | 2.557 | 2.275 |

Goian, kopuru hauen ehunekoak iruzkintzean esandakoek honako ere balio dute. Informazio horiek osatzeko, zifra hauek eta goiko laukietakoak gogoan ditugula, argigarri izan daiteke beste zenbait Auzo donostiarren euskalduntasunarekin alderatzea, Egiak duen egoeraz hobeki jabetzeko. Horretarako, Alde Zaharra (euskaldun-ehunekorik handienetakoa duena), Antigua (bigarren mailako portzentaia altua duena), Gros (Egiarenetik hurbil duguna) eta Altza (euskalduntasun apalena duena) ekarriko ditugu hona:

16. 1986ko Udal Errolda: "Población mayor de un año según conocimiento del euskera, edad y sexo [por Barrios: Egia]". Neuk landua.

GAITASUN ONEKO EUSKAL HIZTUNEN PORTZENTAIAK, AUZOKA (%) (1986)[17]

| *Gaitasuna* | *Alde Zaharra* | *Antigua* | *Gros* | *Egia* | *Altza* |
|---|---|---|---|---|---|
| Ongi ulertu | 48 | 38 | 32 | 24 | 14 |
| Ongi mintzatu | 43 | 34 | 27 | 21 | 13 |
| Ongi irakurri | 34 | 26 | 22 | 17 | 10 |
| Ongi idatzi | 29 | 24 | 20 | 15 | 10 |

Auzo euskaldunenetik erdaldunagoetara zerrendatu ditugu aukeratutako Auzo horiek: gaitasun portzentaiarik jasoenak Alde Zaharrari dagozkio, eta Altzari txikienak, eta horrela, lau gaitasunei dagozkien ehunekoetan.

Auzoetako portzentaia horiek Donostiako portzentaia orokorrekin ere aldera daitezke: % 30 zen Donostian euskara ongi ulertzen zuena (1986), eta hurrengo gaitasun-ehunekoak aski jasoak ditugu (mintzatu: % 26; irakurri: % 21; idatzi: % 19). Horren arabera, Gros dago Donostiako portzentaia orokorretik gertuena, eta Egia, berorren puxka bat atzetik ageri da. Bestalde, laukian jaso ez ditugun arren, Egiaren atzetik dator beste zenbait Auzo euskal hiztun onen ehunekoetan (ongi ulertzen dutenak: Intxaurrondo, % 23; Bidebieta, % 17), baina badago goragotik doanik ere (*idem*: Herrera, % 37; Ulia eta Martutene: % 34; Amara Berria: % 30, etb.).

1986ko Erroldaren bidez egin ahal izan dugun lehen hurbilketa honek badu Errolda berean, zehazkiago balioztatzeko informaziorik ere, hizkuntz tipologia zehatzago baten bidez egindakoa, eta honetaz ere zerbait azaldu beharra dago, Egiaren euskalduntasun maila eta kalitatea hobeki deskribatzeko.

### 3.3. Hizkuntz tipologiaren araberako deskribapena

Honainokoetan 1986ko egoera lau gaitasun-moten (ulertu, mintzatu, irakurri, idatzi) eta hiru gaitasun-mailen (Ongi/Zerbait/Deus ez) arabera behatu dugu. Hau dena, ordea, xehetasun hobeagoz ere begira liteke, eta hori egin nahi izan da, orain ikusiko dugun hiztun-tipologiaren bidez.

17. Ibidem: id. Neuk landua.

### *3.3.1. Erabilitako hiztun-tipologia*

Biztanlegoaren gaitasuna zehazkiago ezagutzeko gaitasunen tipologia mailakatu bat erabili da, hiztungoaren gaitasuna bere osoan eman dezan. Horretarako hiztunak zazpi egoera-tipotan banatu dira, ondoko laukiaren arabera:

ERROLDAN ERABILITAKO HIZTUNEN TIPOLOGIA (1986)

| | |
|---|---|
| 1. Tipoa | Euskaldun alfabetatuak: Euskara ongi ulertzen, mintzatzen, irakurtzen eta idazten dutenak |
| 2. Tipoa | Euskaldun erdi-alfabetatuak. Euskara ulertu eta mintzatu ongi egiten dute; irakurri eta idazteko zailtasunak dituzte. |
| 3. Tipoa | Euskaldun alfabetatugabeak: Euskara ulertu eta mintzatu ongi egiten dute, baina ez dute irakurri eta idazten deus. |
| 4. Tipoa | Ia-euskaldun alfabetatuak: Ongi edo nekez ulertzen dute euskara, hitz egin nekez, eta irakurri eta idatzi ongi edo nekez egiten dute. |
| 5. Tipoa | Ia-euskaldun alfabetatugabeak: Ongi edo nekez ulertzen dute euskara, nekez hitz egiten, eta ez dute irakurri eta idazten deus. |
| 6. Tipoa | Ia-euskaldun pasiboak: Euskara ulertu ongi edo nekez egiten dute, baina ez dute hitz egiten. |
| 7. Tipoa | Erdaldunak: Euskara ez dute deus ulertzen eta hitz egiten. |

Tipologia argigarriago honi heldu aurretik, ez da lekuz kanpo egongo Donostiaz eta Egiaz argazki larria eta urrunagoko bat gogoan izatea, geroago emango direnen atariko bezala.

### *3.3 2. Egia-Donostietako hiztun-talde nagusiak*

1986ko Erroldan aintzakotzat hartutako egiatarren kopurua 15.240 lagunekoa izan zen (betiere urtebetetik gorako bizilagunak, puntu honetan hiztuntasunari buruz ari baitzen Errolda). Zazpi moldetako tipologia horretatik hiru talde nagusi egin nahi izanez gero, lehen begiratu batean deigarri diren ezaugarriak zifra gutxi batzuetan eman daitezke.

Laukian aurkeztutako zazpi hiztun-tipo horiek ahantzi gabe, hiru taldetara baldin bagatoz eta Hiriko datu orokorrekin alderatuz, hona nola zegoen banatuta Auzoan Egiako hiztungoa:

**Donostia eta Egia auzoa:**
BEREN HIRU HIZTUN-TALDE OROKORRETAN (1986)[18]

| *Hiztun-taldeak* | *Egia* | *(%)* | *Donostia* | *(%)* |
|---|---|---|---|---|
| Euskaldun osoak (1-2-3. tipoak) | 3.164 | % 21 | 45.829 | % 27 |
| Ia-euskaldunak (4-5-6. tipoak) | 3.286 | % 21 | 40.200 | % 23 |
| Erdaldun hutsak (7. tipoa) | 8.790 | % 58 | 85.646 | % 50 |

Donostiaz eta Donostiako Auzo batez ari garenez, bestelako iruzkinik egin aurretik, ongi etorriko da euskal Hiriburuen artean Donostiak duen euskaltasun-lekua zerbait argitzea. Guztion arteko alderaketa egiten hasi gabe, Bilboko egoerarekin alderatuko dugu Hiriburu giputzekoa.

Bilboko euskaltasunaren gainetik zegoen Donostia, hemen ageri diren ehunekoetan, eta kasuren batean baita kopuru absolutuan ere. Honela, Bilboko euskaldun osoak Donostiakoak baino gutxiago ziren 1986an, kopuruz (33.956) bezala ehunekoaz (% 9), ia-euskaldunak kopuruz nabarmenki Donostiakoen gainetik geratzen ziren bitartean (76.042), eta portzentaiaz azpitik (% 20,32). Erdaldun hutsak, ostera, garbiki gehiago ziren Bilbon, Donostian baino (264.209: %70)[19].

Donostiako datu orokorretan Egiak duen euskaltasun-maila Hirikoaren zerbait atzetik ageri zaigu 1986an: alde batetik, erdaldunek portzentaia handiagoak dituzte Auzoan Hirian baino (Egiak % 58, Donostiako % 50aren ondoan), eta euskaldun eta ia-euskaldunetan, ostera, ehuneko apalagoak ditugu (% 21, bi taldeetan), Donostia gorago ageri zitzaigun bitartean (% 27 eta 23).

Euskaldun osoen tipoa talde nahiko segurua da (betiere ezagutzaz ari gara hemen), baina, ikusi dugu, adin-multzoetan gora egin ahala, bigarren taldera zerbait lerratzeko joera zuela. Erdizkako euskaldunen edo erdi-euskaldunen taldea, berriz, zalantzaz betetakoa da: errazki egin dezake erdaldunen aldera, adin-piramidean gora egin ahala. Hirugarren taldea,

18. 1986ko Udal Errolda: “Población mayor de un año según conocimiento del euskera, edad y sexo [por Barrios: Egia]”. EUSTAT (1988): *Hizkuntza eta euskara. Euskadiko KA. ko 1986ko biztanleen Udal Errolda*. Vitoria-Gasteiz: Eustat. 111 (Kike Amonarriz-ek eskuratutako Hiriko datuak). Kalkuluak neureak dira.

19. Ibidem: kalkuluak neureak dira.

erdaldunena, segurua da, oso berean finkaturik dago; hala ere, esan behar da, Errolda honetan taldearen izaera hori ezagutzen dugula, baina ez, ordea, erdaldun horien euskararekiko pentsamoldea, jarrera pertsonala eta zenbait garrantzizko erabakitan (haurren hezkuntzan, adibidez) duten jokabide praktikoa.

### *3.3.3. Hiztunen ama-hizkuntza eta tipoen banaketa*

Laukian hiru talde nagusitara soildu dugun informazio hori, komeni da xehetasun hobez biltzea ere. Argitasun handiago horren aldera, eman dezagun hemen zazpi hiztun-tipo ezagunak nola ageri zaizkigun gure Auzoan, hori ama-hizkuntzaren datuarekin gurutzatuz:

EGIA: HIZTUN-TIPOEN BIZTANLE-BANAKETA,
AMA-HIZKUNTZEN ARABERA (1986)[20]

| *Hiztun-tipoa/Ama-hizkuntza:* | *Eusk.* | *Gazt.* | *Biak* | *Beste* | *Ez dak.* | *Orotara* |
|---|---|---|---|---|---|---|
| 1. Euskaldun alfabetatuak | 1.111 | 586 | 564 | 9 | 0 | 2.270 |
| 2. Euskaldun erdi-alfabet. | 462 | 117 | 86 | 0 | 1 | 666 |
| 3. Euskaldun alfab.gabeak | 133 | 41 | 54 | 0 | 0 | 228 |
| 4. Ia-euskaldun alfabetatuak | 116 | 1.645 | 167 | 14 | 0 | 1.942 |
| 5. Ia-euskald. alfab.gabeak | 128 | 599 | 99 | 7 | 0 | 833 |
| 6. Ia-euskaldun pasiboak | 41 | 440 | 22 | 8 | 0 | 511 |
| 7. Erdaldunak | 87 | 8.292 | 89 | 249 | 73 | 8.790 |
| **Orotara .........** | **2.078** | **11.720** | **1.081** | **287** | **74** | **15.240** |

Laukian hiru balio hartzen dira aintzakotzat: Auzoa, erantzulearen ama-hizkuntza eta euskararekiko duen hiztun-tipoaren osotasun-maila. Ama-hizkuntza euskara, gaztelania, biok nahiz besterik izan daiteke (eta badira gutxi batzuk xehetasun hori ematen ez dutenak). Inkestatua da erantzule Erroldan, eta bakoitzak bere buruaz duen iritzia ematen du (alfabetatua den ala ez, etab.: azken buruan, bere burua zein tipotako hiztuntzat daukan adierazten digu).

1. *Euskaldun alfabetatuak*. Bere burua "euskaldun alfabetatutzat" dutenak ez dira denak eta bakarrik ama-hizkuntza euskara dutenak: hor daude gaztelania ama-hizkuntza duten 586 lagun, edo alde

20. 1986ko Udal Errolda: "Población mayor de un año según conocimiento del euskera, edad y sexo [por Barrios: Egia]". Neuk landua.

horretatik euskara eta gaztelania ere ama-hizkuntza izan duten beste 564 lagun. Orotara, 2.270 dira euskaldun alfabetatuak.

2. *Euskaldun erdi-alfabetatuak*. Ez da, kopuruz, talde mezprezagarria (666), eta aurreko taldearekin batzen badugu, nolabait alfabetatutakoak ia hiru milara iristen dira Egian. Kontzeptuaz zalantzak izan baldin badaitezke ere, gogoan hartzekoa da tipotalde hau.

3. *Euskaldun alfabetatugabeak.* Ez da kopuru handia (228), eta galdetzekoa da euskaldunok geure buruaren alfabetakuntzaren listoia non jartzen dugun, eta euskarari opa diogun alfabetatze jatorra erdarari ezagutzen diogunaren paretsukoa den ala ez.

4. *Ia-euskaldun alfabetatuak.* Talde berriz ere ugaria da, eta bi muturren arteko (euskaldun alfabetatuen eta erdaldunen arteko) erdiko erpina da (1.942 lagun). Hiztun-molde honek, hala ere, anbiguitateren bat badu, bere hizkuntz dinamikari buruz: erdi-euskalduna denez, erdaldunetara errazegi lerra daiteke; edota, alfabetatua izaki, goiko euskaldun (erdi)alfabetatuen multzoak indarberri ditzake.

5. *Ia-euskaldun alfabetatugabeak*. Gogoan hartzeko moduko taldea da, kopuruz (833), baina bere euskalduntasuna oso ahula gerta daiteke, alde bietatik maila apala baitu (hizkuntza ulermen-mintzamenetan, eta irakurmen-idazmenetan). Hala ere, ez da guztiz pasiboa, eta hori du bere itxaropen-arrazoirik onena, euskararantz lerra dadin.

6. *Ia-euskaldun pasiboa*. Euskalduntasunaren mailarik apalenean gaude kasu honetan, eta kopuru estimagarria da (511). Inguruko euskaldunak erdaraz jardutera ez bortxatzeko balio izan beharko luke hiztun-molde honek, batez ere belaun berrienganako transmisioa eragotzi ez dezan.

7. *Erdaldunak.* Euskararekiko duten hizkuntz ezagutzaren urruntasuna ematen du Erroldak; baina gainerako datu positibo nahiz negatiboak ere ezagutzekoak lirateke, noski: jarrera tolerantea, interesatua, zalea, edota kontrako jarrerak haurren hezkuntzan, lagunartean, lantegian, etab. Bistan da, oso garrantzizko taldea dela hau, besterik ezean bere kopuru handiagatik (8.790).

Egiako euskaldungoaren argazki hori, Euskal Herri osoko argazki tipologiko berarekin alderatu nahi baldin bada, eta Egiako hiritartasuna aintzakotzat harturik hiri-baldintza hori dutenekin alderatuz, ondoko lauki hau jaso dezakegu, Auzo honen nortasuna bere leku erlatibora ekartzeko:

EGIA ETA EUSKAL HERRIKO HIRIALDEAK:
HIZTUNEN TALDE TIPOLOGIKOEN PORTZENTAIAK (%) (1986)[21]

| *Hiztun-tipoak* | *Euskadi* | *Hirialdeak* | *Donostia* | *Egia* |
|---|---|---|---|---|
| 1. Euskaldun alfabetatuak | 16 | 12 | 19 | 15 |
| 2. Euskaldun ez-alfabetatuak | 2 | 2 | 2 | 4 |
| 3. Euskaldun partez alfabetatuak | 7 | 4 | 6 | 2 |
| 4. Ia-euskaldun alfabetatuak | 11 | 13 | 13 | 13 |
| 5. Ia-euskaldun alfabetatugabeak | 4 | 4 | 6 | 6 |
| 6. Ia-euskaldun pasiboak | 3 | 3 | 4 | 3 |
| 7. Erdaldunak | 57 | 62 | 50 | 57 |

Euskadi, Errolda honetan, Hiru Probintziak dira (Euskadiko Erkidegoa), eta bere barne daude, noski, landa-aldeak bezala hirialdeak ere, herri txiki eta hiri handi. Agerian dago Hiriak bakarrik hartuta baino euskaltasun jasoagoa dutela Hiru Herrialdeek, hain zuzen landa-aldeak euskaldunago izanik, hirietako portzentaia apalagoak jaso egiten baitituzte, euskaldunen eta ia-euskaldunen ehunekoak batuta % 43 izateraino (% 57 erdaldunei kontrajarrita).

Hirietan, ordea, ez dago horrelakorik. Erdaldunek bost puntu gehiago dituzte hirialdearteko ehunekoan (% 62), Erkidegoko portzentaia orokorrean baino alegia. Hala ere, gure Hiriburuen artean, Donostia da euskaldunena duguna, Hirietako euskal ehunekoak ez ezik Erkidegoko orokorra bera ere hobetuz, eta, praktikan, datu guztietan ondoko beste zutabeetako denak edo hobetuz. Erdaldun hutsak % 50era jaisten dira Donostian; hortaz, euskaldunak eta ia-euskaldun donostiarrak % 50 dira.

Egiara gatozela, Auzoa –espero zitekeenez– ez da Hiriko euskalduntasun jasora iristen, eta zerbait beheragotik ikusten dugu: % 15 da euskaldun osoa Egian (Hirian, oro har, % 19 den bitartean), eta erdaldun hutsak % 57 (Hiriko % 50a baino aski goragotik). Hala ere, esan beharra dago, Egiak Erkidego Autonomikoko egoera ia bertatik bertara ispilatzen duela 1986an: ez dago Auzoko eta Erkidegoko zutabeak alderatu baizik, hori ikusteko.

---

21. EUSTAT (1987): *Euskadiko K. A. ko 1986ko Errolda. Emaitza estatistikoen aurrerapena*. Vitoria-Gasteiz: Eustat. 21; EUSTAT (1988): *Hizkuntza eta Euskara. E. A. ko 1986ko Biztanleen Udal Errolda*. Vitoria-Gasteiz: Eustat. 111; EUSTAT (1993): *Hezkuntza eta Euskara*. Vitoria-Gasteiz: Eustat. 113. Bi urtetik goragokoak hartu dira aintzakotzat; alfabetatzean, ostera, lau urtetik goragokoak.

Bukatzeko, esan dezagun hamar urtetako aldakuntza zenbait azpimarragarria izan dela Donostian: erdaldun hutsen portzentaia zerbait behera etorri zen (1981ean, % 51, eta 1991an, % 46), aldi berean euskaldun alfabetatuak %12 izatetik % 20 izatera iritsiz, gainerako hiztun-tipoetan ere ehunekoak eutsi edo hobetzen ziren bitartean[22].

Oro har, Egian bizirik zegoen euskara (1986), Euskal Herri osoko euskaldunen batezbestekoraino iritsi gabe, baina abantaila eta arrisku handi batekin: Hiriburu batean aurkitzen da, eta gero eta biztanleria bertakotuagoan (ez dirudi, berehala behintzat, erdal etorkin berriek hartuko dutenik), eta garai batean ez bezala, hezkuntza sistema elebiduna eskueran duela. Horrenbestez, bideragarri ere izan daiteke euskara hiritartu bati bide ematea. Segur aski ondoko Erroldetako datuek berretsi baizik ez dute egingo datu hau (betiere galdera isil batekin: Noiz arte, eta noraino, iritsi ahal izango da euskaldungoaren modernotze-ibilera hori? Helduko ote da hizkuntz normalizazioak eskatzen duen arrastora?).

Auzoan euskararen alde lanean dihardutenek erantzukizun nabaria dute bertan, estatistika hotzeko giza taldeok identifikatzen, sustatzen, xede kultural eta sozial berrituak ematen, Egiaren betiko euskal nortasunean etorkizuna txertatzen. Praxi gidatzaile egoki batek hartu beharko du horren ardura, egiatarren borondateak irabazi eta beroriei euskararen protagonismoa pasatzeko.

Esan bezala zeuden gauzak Auzo honetan 1986an; baina hobera egitea zerbait lehenagotik zetorren, euskararen aldeko ahalegin sozial eta ofizialak lehentxeago hasi zirenetik edo, eta aldabide horrek bere segida izan du ondoko urteetan.

## 4. Egiako hizkuntz bilakaera (1981-1996), zenbait daturen argitan

Aurreko orrialdeetan saiatu gara, 1986ko urtea adibide egokitzat harturik, Egiako deskribapen soziolinguistiko orokor bat eskaintzen, betiere funtsezko zenbait datu ekarriz. Hizkuntz gaiari honi dagokion beste kapitulu honetan ez gara sartuko 1991 edo 1996ko deskribapen osoak egiten. 1986koarekin lehen hurbilketa orokor baterako aski informazio emanik geratu dela pentsatu nahi dugu. Horregatik, beste jite batean helduko zaio gaiari berehalako orrialdeetan.

———

22. SIADECO (1986): *Euskara Donostian. Azterketa soziolinguistikoaren laburpena*. Donostia: Euskararen Udal Patronatua. (1981eko datuak: [18]; eta 1991rako: Eustat 1993: 113. Hiztun-tipo bakoitzeko datuak honela dira, hurrenez hurren 1981/1986/1991etarako: 1) 12/19/20; 2) 2/2/2; 3) 8/6/6, 4) 15/13/15; 5) 8/6/6; 6) 4/4/5; 7) 51/50/46.

1991ko nahiz 1996ko datuen bidez bi gauza egin nahi ditugu: a) Lehenik, Egia, Donostian eta bertako beste Auzoen artean hobekixeago lekutu, eta b) Aurreko kapituluan esandakoei argibide osagarri batzuk gehitu. Azkenik, beste aurpegiera bat bilatuz, gertatutako aldakuntzei begiratu diakroniko bat ematen saiatuko gara, bere osotasunean ez bada, datu hautatu batzuen bidez, behintzat. Honetarako 1981etik honako argibide batzuk erabiliko ditugu.

### *4.1. Egia-Donostietako hiztun-talde nagusiak*

1986rako, aurreko orrialdeetan ikusi dugu hiru talde orokor hauen esanahia, eta bakoitzari zegozkion kopuru eta portzentaiak. Bost urte geroagoko datuak dakartzagu orain hona.

DONOSTIA ETA EGIA: BEREN HIRU HIZTUN-TALDEAK
(Kopuruak eta ehunekoak, 1991)[23]

| *Hiztun-taldeak* | *Egia* | | *Donostia* | |
|---|---|---|---|---|
| Euskaldun osoak (1-2-3. tipoak) | 3.013 | 22,06 | 46.652 | 27,33 |
| Ia-euskaldunak (4-5-6. tipoak) | 3.523 | 25,78 | 43.988 | 26,10 |
| Erdaldun hutsak (7. tipoak) | 7.126 | 52,16 | 78.517 | 46,57 |
| Orotara | 13.662 | 100,00 | 168.602 | 100,00 |

Bi urte eta gehiagoko biztanleak

1996ko Erroldaren gain egindako azterketan, 1991ko talde hauen kidekoak dira “euskaldunak”, “elebidun hartzaileak” eta “erdaldun elebakarrak” bezala birdefiniturikoak. Definizioen hurbiltasunagatik kidekotzat emango ditugun taldeok (1981eko tipologia, eta 1996koa, alegia) elkartuta ondoko lauki hau izango genuke datuen bilakaera ikusteko:

---

23. 1991ko Udal Errolda: “Bi urtetik goragoko biztanleen euskara-maila, adinaren arabera, auzoz auzo: Egia”, in: GAZTERIA SAILA (1997): *1996ko biztanleen Udal Erroldaren ustiaketa (eta informazio gaurkotuagoa ez dugun gaietarako, 1991ko zentsuarena)*. Donostia: Donostiako Udala. 22, 54. Hemen aintzakotzat hartutako Donostiako biztanle-kopuru osoa 168. 602koa zen, eta, batutzeke, horrelaxe eman dugu laukian; hala ere, esan behar dugu laukia osatzeko, besterik eskura ezean, zatikako hiru kopuruak ehunekoetatik ateratakoak direla hemen, eta berauen zinezko batuketa osoa 169. 157 da. Ehunekoak aipatutako iturritik jasoak dira, ordea.

GAITASUNAREN-BILAKAERA (DONOSTIAN ETA EGIAN, 1981-1996)[24]

| *Urtea* | | *Euskald.* | *Eleb.hartz.* | *Erdald.* |
|---|---|---|---|---|
| **1981** | **Donostia** | 21,4 | 23,6 | 55,0 |
| | **Egia** | — | — | — |
| **1986** | **Donostia** | 26,0 | 19,7 | 54,3 |
| | **Egia** | 20,6 | 18,5 | 60,9 |
| **1991** | **Donostia** | 27,3 | 20,8 | 51,9 |
| | **Egia** | 21,9 | 20,8 | 57,2 |
| **1996** | **Donostia** | 32,6 | 20,7 | 46,8 |
| | **Egia** | 29,5 | 18,5 | 52 |

Bost urte eta gehiagoko bizilagunen arteko datuak

Aurreko estatistiketan ikusitakoen ondoren, hemengo zifrek ez gaituzte sobera harrituko: Donostiako datuen zerbait azpitik ageri zaigu Egiako euskaltasunaren egoera. Urtean urteko egoera alderatu horien ondoan, azpimarratzekoa da Donostiako Hiriak eta Egiak beren aldetik daramatzaten bilakaera-erritmo ezberdinak.

Donostian euskaldunen portzentaia azkarki indartu da, datu horien arabera, hamabost urte horietan: 1981ean, biztanleetako %21,4koa zen Donostian euskaldunen portzentaia; 1996an, ostera, zifra hori %32,6 izatera pasa da. Aldakuntzan, ba, Donostiako euskaldunek, betiere ezagutzaren aldetik, %11,2 puntu irabazi dituzte hirian.

Hemen aintzakotzat hartzen den "Egia"-ren 1981eko berririk ez dugu eskura (esan bezala, Siadeco-ren azterlanak izen horrekin beste eremu zabalago bat izan baitzuen gogoan); hurrengo bost urterokoetan ikus daiteke Auzoko egoeraren hazkundeak nola egin duen gora, erritmo azkarragoz, gainera, azken urteetan: %20,6 zen euskaldun osoa 1986an, eta %29,5 hamar urte geroago. Atzera-beharraren joera balaztaturik dago, ba, Auzoan, eta indarberritu ere egin da euskaldungoa, hizkuntz gaitasunaren ehunekoaren aldetik.

24. JAURLARITZA (1997): *II. Soziolinguistikazko Mapa*: Vitoria-Gasteiz: Eustat. II, 506; III, 105.

Horrela, ondorengo laukian deskribatuko den egoerak etorkizunean hobera egin dezakeela pentsa daiteke, eta betiko mintzatzaile-galerei hesiren bat jartzen asmatu dela, orain-oraingoz. Ikus dezagun, ba, zein zen galera berrietatik babestuagoa dugun Auzoko egoera hori 1991n.

### *4.2. Euskararen ezagutza Egian, adinen arabera (1991)*

Goian emandako sailkapen orokor hori adin-multzoka begiratu nahi bada, ondoko laukian du irakurleak horretarako aukera. 1986rako ikusita daukagu hau bera, baina han euskararen ezagutza lau esparrutan banaturik ageri zitzaigun (binaka: ulermen-mintzamenak, irakurmen-idazmenak); hemen, berriz, hiru hiztun-talde orokorrak dira adinarekin gurutzatzen ditugunak:

**Egia Auzoko**

EUSKARAREN EZAGUTZA-MAILAK, ADINAREN ARABERA (%) (1991)[25]

| *Adin-multzoak* | *Biztanleak* | *Euskaldunak* | *Ia-euskald.* | *Erdaldunak* |
|---|---|---|---|---|
| 2/4 urtekoak: | 269 | 28,25 | 42,01 | 29,74 |
| 5/9 urtekoak: | 452 | 54,20 | 30,31 | 15,49 |
| 10/14 urtekoak: | 721 | 37,45 | 43,27 | 19,28 |
| 15/19 urtekoak: | 1.100 | 28,73 | 46,94 | 24,36 |
| 20/29 urtekoak: | 2.342 | 22,97 | 37,87 | 39,15 |
| 30/39 urtekoak: | 1.785 | 17,92 | 29,57 | 52,21 |
| 40/59 urtekoak: | 3.528 | 15,27 | 18,33 | 66,40 |
| 60… urtekoak: | 3.465 | 20,31 | 11,02 | 68,67 |
| **Orotara** | **13.662** | **22,06** | **25,78** | **52,16** |

Bi urtetik goragoko biztanleak

Ezagutza, esan dugu, bere orokortasunean begiratzen du lauki honek (baina estatistikoki, gizarteko adin-multzo guztiak jaso gabe); alegia, lehenengo bi hiztun-taldeetan hirukote bana bilduz: hots, “euskaldunak” = 1-2-3. tipoak dira, eta “ia-euskaldunak” = 4-5-6. tipoak. Hortaz, deskribatuta daukagun tipologiaren arabera irakurri behar da hemengo informazioa, hau da, tipo-multzo hirukoitz bakoitzean ezagutza-maila hori hirukoteko gutxieneko ezagutza-mailaren gainetik ezarriz. Horren ara-

25. Gazteria Saila 1997: 54, 55. Laukiko portzentaia partzialak geuk landuta. Bi urtetik goragokoen datuak dira, beraz. “Euskaldunak”: tipologiako lehen hirurak (1-2-3); “Ia-euskaldunak”, ostera, hurrengo hiru tipoak (4-5-6). “Erdaldunak”, erdaldun hutsak dira.

bera, laukiko “euskaldunek” gutxienez euskara ulertu eta mintzatu ongi egiten dute, baina ez dute denek irakurri eta idazten, eta alfabetatu gabeak dira.

“Ia-euskaldunei” buruz neurri-molde bertsua erabili behar da: ia-euskaldunetakoek tipo-hirukoteko (4-5-6) ezagutza-mailarik apalenetik gorako gaitasuna dute euskaraz. Hau da, ia-euskaldunak gutxienez euskaldun pasiboak dira (6. tipoa), eta hainbat hiztun gaitasun horren gainetik dabil (4-5. tipoak). “Erdaldunak”, aipatuta ditugun erdaldun hutsak dira hemen ere.

Orotara ditugun ehunekoen arabera (13.662 bizilagun gogoan izanik), Egiako euskalduntasunak hobera egin zuen 1986tik 1991ra: “Euskaldunak” puntu bete gora egin zuten (orain, % 22,06; 1986an, %21); baina “ia-euskaldunak” dira aurrera-pauso nabarmenagoa izan dutenak: % 21etik ia % 26raino igoz. Azkenik, guztiaren ondorioz, erdaldun hutsen portzentaia jaitsi egin zen nabariki, elebitasun errotuago baten mesedetan (% 58, 1986an; % 52,16, 1991n).

Zer pentsa horretaz guztiaz? Ohartzekoa da, euskaldun osoen taldeak gehiagora egin duela, noski, eta euskaldungoaren kasik betiko galeren ondoan suspergarria dela datu berri hau, galdu ordez irabazi egin baitugu euskaldun osotan. Horren ondoan, hala ere, galdetzekoa da ia-euskaldunen gorakadak nolako etorkizuna izan dezakeen, hau da: ia-euskaldunek (hizkuntzaren gaitasuna erdizka bakarrik dutenek) zenbateraino daukaten segurtaturik beren euskal leialtasuna, nahitaez gizarteko erdaren zamapean egonik. Gorago ere azpimarratu dugu gure kezka hau, erdara hutsera lerratzeko arriskua bertantxe baitu, oro har, ia-euskalduna denak.

Labur beharrez, hemen ez gara iruzkin gehiagotan sartuko, baina irakurleak, nahi izanez gero, 1986ko adinaren araberako, euskararen ulermen-mintzamenei dagokien laukiko datuekin aldera dezake lauki honetako datu-zerrenda. Adinez adin, han “ongi” eta “zerbait” zekitenak hemengo “euskaldun” eta “ia-euskaldunekin” erkatuz, batez ere adin-multzo taldeetan interesgarria gertatzen da konparazio hori.

### *4.3. Egiako euskalduntasuna, Donostiako Auzoen artean (1991)*

Ikusita daukagunez, Donostiako Auzoek, beren historia eta egitura demografikoaren ondorioz, euskalduntasun-maila eta molde ezberdinak dituzte. Honainoko orrialdeetan saiatu gara, Hiri osoko datuen argitan, Egiako euskalduntasuna batik bat zenbatekoa den erakusten.

1991ko Erroldaren datuetatik begiraturik, ondoko eskailera hau molda daiteke, Donostiako euskaldun osoen (1-2-3. tipoen batuketa) ehunekoak Auzo bakoitzari emanez. Ikus dezagun, ba, Egiari zein leku dagokion guztien artean.

EGIA ETA BESTE AUZOETAKO EUSKALDUNEN PORTZENTAIAK (1991)[26]

| > % 40 euskaldun | | % 40-% 30 euskald. | | % 30-% 20 euskald. | | < % 20 euskald. | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|
| Igeldo | 59,9 | | | | | | |
| Añorga | 53,4 | | | | | | |
| Parte Zaharra | 41,7 | | | | | | |
| Ibaeta | 40,6 | | | | | | |
| | | Mirakontxa | 37,5 | | | | |
| | | Antigua | 35,1 | | | | |
| | | Herrera | 32,9 | | | | |
| | | Aiete | 32,4 | | | | |
| | | Martutene | 31,4 | | | | |
| | | Erdialdea | 30,9 | | | | |
| | | | | Ulia | 29,4 | | |
| | | | | Loiola | 28,1 | | |
| | | | | Gros | 27,6 | | |
| | | | | Amara B. | 27,2 | | |
| | | | | Amara Z. | 24,4 | | |
| | | | | EGIA | 22,1 | | |
| | | | | Intxaurrondo | 22,0 | | |
| | | | | | | Bidebieta | 18,7 |
| | | | | | | Altza | 15,9 |

Euskal Herriko Hiribururik euskaldunenaren barnean horrela banatzen dira Donostiako Auzoak. Esan beharrik ez dago (ikusita baititugu hori erakusten diguten datuak) Egia bere euskalduntasunaren apalean ere ez dagoela hain gaizki bere euskalgintza sendoago bati heltzeko, nahiz eta eskeilara honetan oso behean agertzen zaigun.

### *4.4. Orokorki, Egiako iragan linguistikoaz*

Egia (izen honek izandako esparru zabalean) betidaniko Auzo donostiar euskalduna izan dugu, biztanlez eta lurrez. Mende honen lehen hamarkadetan hasi zen hori aldatzen, eta 1936ko gerrate ondoren bizkortu zen alda-joera hori, gerraren beraren ondorioz baino areago, ordutik aurrera azkartutako politikak eta kanpotarren migrazioak eraginda.

Hizkuntz trukaketaren gertabidean, etorritakoen borondate erabakiak baino ezarrita zegoen egoera sozio-ofizialak du deseuskalduntzearen (edo hobeki: etorritakoen euskalduntze-ezaren) erantzukizuna: Eskola egokirik

26. Gazteria Saila 1997: 4. Planoa.




**Aitor Ikastola.** Egia ez zaio arrotza gertatu azken hamarkadetako euskalgintzari, eta auzotarrek gisa ezberdinetan heldu diote euskara indartzeari, belaun berriei horretarako erraztasun hobeak sortuz ere bai. Ikastola da horren adibide bat.

eza, hiztungo ahulenari ezartzen zitzaizkion baldintza txarragoak, Euskal Herrian oro har hiriztatzeak ezarri izan duen mende honetako erdalduntze-prozesua. Abiapunturik euskaldunena izanik ere, Egiak ezin izan du kontra-zama hori tente eraman, eta baldintza larri haiek abaildu dute.

Batez ere 1945-1975.etako hiru hamarkadetan egin du atzera euskarak, Egiako bere ehunekoetan. Hala ere, ezingo da ahantzi, aldabide horretako unerik txarrena ozta-ozta igarota zenean (1981), Egiak bere garairik euskaldunenetan baino euskaldun-kopuru handiagoa zuela (1887ko biztanle euskaldun elebakar haiek –milaren bat pasatxoak– 3.164 euskaldun oso bilakatu baitziren 1981ean).

Azken urte horretatik honakoak (1998) ongi begiratzea merezi du, zalantzarik gabe. Beharbada, gure aldeko koiuntura batera pasatzen ari gara, ikusi ahal izan ditugun datuek iradokitzen digutenez. Hala ere, elebiduntzeko olatu berria noraino iritsiko da? Urte batzuen buruan, adin-multzo eta sektore ezberdin guztiak ongarriztatuko ote ditu? Eta haur-gazteetan lortutako euskalduntasun-maila aski izango ote da, batik bat erdalduna dugun gizartean eta berorren hiriko moldeetan, erdaltasun berdintzaileari gaina iraunkorki hartzeko?

Zalantzarik gabe, egiatarren hizkuntz kontzientziak, jarrerak eta borondateak dute hemen hitza. Hori dena nahikoa ez izanik ere, hori gabe zaila, eta agian ezina, izango da Egia berreuskaldunduaren helmugara iristea.

Egiatarrek arrazoi anitz dute beren historian, Auzoko guztien euskal ondarea gorde eta indarberritzen ahalegintzeko. Eta Egiak lan horri, beste Donostiako zenbait Auzok baino baldintza zailagotatik ekin behar baldin badio, eskubide du euskal kulturgintza hau sustatzeko diskriminazio positiboagoa eskatzeko ere. Hori, bai, lana burutu, kanpotik bakarrik ezingo dela burutu ongi jakinda, noski.

## AZKEN BEGIRATUA - CONCLUSIONES

La historia de las ciudades suele mostrar rostros físicos variados; son testigos de ello los planos de las mismas. Esa pluralidad de formas refleja los condicionantes topográficos de cada caso y las formas de vida ciudadana de sus habitantes.

Pero la población acogida a los grandes núcleos urbanos vive gran parte de su cotidianidad, no genéricamente en "la ciudad", sino en espacios y comunidades barriales más acotados. Las páginas precedentes, sin llegar a ser una historia total, han querido mostrar aspectos sustanciales de un caso de éstos, el del Barrio donostiarra de Egia.

A lo largo de los siglos, tan donostiarras han sido las entidades de población más o menos dispersas del territorio municipal abierto, como el núcleo urbano que lo ha gobernado e incluso simbolizado en su conjunto. Queremos decir que San Sebastián fue una y múltiple, como en buena parte lo es hoy.

La apertura de la muralla y los ensanches sucesivos no terminaron de dar forma acabada a la nueva ciudad; han sido los Barrios los que, haciéndose desde sí mismos y con el estímulo del centro histórico ampliado de Donostia, han generado la fisonomía final de la ciudad. El relativo policentrismo urbano que eso supone merece ciertamente la atención del observador.

Por otra parte, para una masa poblacional importante, la historia personal de cada cual (tanto en la etapa pre-urbana como más tarde) ha sido vivida fundamentalmente en las periferias de barrio, lo que supone una experiencia comunitaria de significado propio.

En ese contexto, las dinámicas de continuidad y cambio presentan características que pueden ser notablemente diversas de las del núcleo central de la ciudad: ritmos de cambio específicos, formas de relación personal y colectiva caracterizadas de otro modo, protagonismos barriales originales, etc.

En esta breve historia de Egia hemos podido observar algunos de estos protagonistas –físicos o humanos– que "han hecho Barrio", desde las viejas marismas que dieron paso a los cultivos o los caseríos que se reconvirtieron también, al Duque de Mandas que dejó en herencia un Parque o

los franciscanos que forjaron mentalidades; desde los antiguos frontones tan queridos (1877…) y el olvidado Velódromo (1888) hasta el más reciente Campo de la Real…

Es imposible entender a las generaciones pasadas y presentes de Egia sin su Barrio, o mirándolos tan sólo (o casi) desde el Centro, que es a su vez otro Barrio.

Y a la inversa: los egiatarras, protagonistas una vez más, bien saben en qué medida se benefician hoy de la dinámica urbana general de San Sebastián, al acoger mejoras cualitativamente importantes, observando crítica y constructivamente las propias iniciativas y las que se les proponen desde los intereses más generales de la ciudad.

Ciertamente, los últimos treinta años no han sido en Egia los menos fecundos en reformas e innovaciones, y merecen observarse en ese retrovisor que es su historia. Aquí se ha hecho un modesto esfuerzo en esa dirección.

**1.** Mundua ezagutzeko bidaiaren bat hasi nahi dugula eta, hiri handi nahiz txikien planoak eskuratzean, gauza bat ikusten dugu argi: munduko hiri eta herriek beren berariazko soslaia fisiko ezberdinak dituztela. Batzuetan ibai eta kamino-kale mehar baten inguruetan luze-luze eginda ageri dira, bestetan katedral baten bueltan bildu-bilduta, etxeak bertara apropos metatu balira bezala. Hiriak inoiz izar gisara zabaltzen dira, olagarro bailiran kanpora-bideetan hedatuz… Denetarik dago, bada, munduan.

Hirietako ezaugarri fisiko orokor horiek, ordea, ez dituzte berehala erakusten hiri-barneko bilgune bereziak, auzoak, kale-lagunarteak, bertako jendeek izan ohi dituzten bizigune errealak, hiritarrak ez baitira Hirian bizi, halako eta bestelako auzotan baizik, historia pertsonala eta bere familiakoa bertantxe eginez.

Horrek ez du ukatzen, noski, nonahi dagoen edo inon ez dagoen "Hirira" auzotarrak ere iritsi beharra. Aisia-lekuren bat Auzotik kanpo izango da, gaixotzean kanpoko erietxeren batera eramango gaituzte, orain gainera supermerkatu handiak Hiritik at ere bila ditzakegu, eta gure kanposantua izango dena beharbada ez da inoiz geure Auzoan egongo… Aldian aldiko erakarmen edo zerbitzuok beren unea dute, betiere.

Hala ere, geure Auzoaren indarra ez da galdu, bestelakorik itxaron zitekeen arren: Auzo bakoitzak bere polikiroldegia nahi du, Kultur Etxeak Auzoetara zabaldu dira, berdeguneak ere urrun batean baino Auzoan nahiago, egunkarietan Auzoetarako orri bereziak idatziko dira, eta urteroko Auzoko jaiei beren lekua emango zaie… Hirietako auzotasunak badu, ba, funtsik.

Horregatik, hemen ikusi dugun historia ez zaigu arrotza gertatuko, geurea baizik, ondoko Auzoetakoak bezain errespetagarria, gozagarria.

Egia-Atotxako komentu “zahar” batek eman digu hemen aukera, Egiari buruz hitz egiteko, eta Egiaren zinezko historia osoa egiteke geratzen zaigula jakinik ere, hainbat albiste jakingarri bildu ahal izan dugu orrialde hauetara.

**2.** Historia hori hasieratik edo gogorarazi nahi izan dugu, azken orduko porlanak eta eraikin elkorrek desmemoria ez gintzaten.

Egia eta Donostiako beste baserri-auzoak Hiriko erdigune harresitua bezain donostiarrak izan direla gogoratu dugu, nahiz eta zenbait historialariren lumetan ahantziegiak diren. Egiaren erro horiek argitara ekartzen saiatu gara, lehenengo, orrialde hauetan, zehaztapen batzuek azpimarratu eta bertako habitat zaharra gogoratuz.

Egiako jatorrizko izadia, moldaera fisiko naturala, bertako ohiko ogibideak, naturarekiko lehia aipatu ditugu, zingiretan lurrak irabazten eta Urumeako urak hezitzen egindako lanak. Horrekin batera, mendetan Auzoak Hiriarekin izandako amodio-urruntasunezko harremana gomuta arazi dugu: donostiar bai, baina Egiatik bertatik izan behar horrek markatu du Auzoko historia osoa (trenbideak ere lagunduta…).

Iragan-min zerbaitekin behatu dugu Egiako baserriartea, orduko zenbait balio kultural behar zen osotasunean jasotzeko bidezko aukera ukatu ere egin zaigulako, pasatuta ditugun gertuko urte gaiztoetan. Hala ere, ziklo historiko zail batetik onik atera garela pentsa daiteke, biziberritzeko grinarekin, alegia: etorritakoak egiatartu dira, eta bertakotarrak egoera berrietara moldatu. Egiak bere gizarte aldatu modernoa du, eta hoberako aldagarri dena.

Modernotasun hori gisa askotan ageri zaigu: molde zaharrak uztean (garai bateko eliz moduak berriekin trukatzean, adibidez), eskolatze-mailak hobetzean, Auzoko ekipamendu sozialetan, herritarren askatasun hobean, familia askoren bizimodu jasoagoan, etab. Baina Egia ere ez da paradisua: langabezia presente dago, gazteriak etorkizun zaila du, giza balio etikoek ez dute samurra aurrera egiten, etab.

Auzoko historia honek (eta orain inoiz baino abiada biziagoan) gauza bat erakutsi digu: errealitate sozio-historikoa aldakorra dela, eta hobera egitea sarritan herritarren eskuetan dagoela, eta aipatu izan diren gizarte-faktoreen eskuetan.

Hortaz, Auzo bezala ongi nahiz eskasago eraiki da Egia, baina gizon-emakumeen borondate eta erabakiek zerikusi zuzena izan dute, aldaera horretan. Etorkizunean areago oraindik.

**3.** 2000. urtetik atzera begiratzean, azken mende eta erdiko ibilera azkar eta aldagarrian erreparatzen du berehala auzotarrak: ez gara, izan ginenak; berritu egin gara oso geure soinean. Inausketarik franko egin da azken hamarkadetan, baina baita txerto aberasgarririk ere, 1863 hartatik hona.

Lantegi handi eta txikiagoak eratu dira Egian (Tabacalera), osasun-etxe modernoak antolatu (Martín Santos, orain Quirón), kirolgune sonatuak egin (Belodromo hura edo Futbol-Zelaia), etxebizitza erraldoiak jaso (Dorrea), eskola eta erlijioso-etxeak ireki (S. Frantziskoko komentua; Aurkezpeneko, Mundaitz eta Ikastola Ikastetxeak), ehundaka eta ehundaka lagun etorri da Egian bizitzera (Euskal Herritik eta kanpotik), eliz antolamendua guztiz bestela moldatu da (bertako Parrokiak)…

Alor batean nahiz bestean, ugari dira horrelako adibideak Egia garaikidean, baina egindakoak ez dira hor *harrituta* geratu, zirkinik gabe eta mugitu ezinik. Orain gutxikoak izanik ere (100, 80 urte…), berriz ere aldabidean ageri zaigu Egian hainbat espazio fisiko eta sozial.

Auzune berriak ari dira moldatzen (Tolaregoia), berehala datoz eraikuntza berriak ere (Atotxa), kultur bizitzak tresna berrituak izanen ditu (Jareño), zenbait erakundek bere historia bat burutu du eta etorkizunerako egokitu da (Konkorreneko Zaharren Egoitza), hernaniarrek ez dute Egiatik pasa beharrik Donostiako Erdigunera iristeko, eta alde batzuetatik begiratuta pasabideko Auzoa izan den hau, egon- eta bizigune bilaka daiteke inoiz baino gehiago.

1975-1996. urteetan bizilagunak galdu arren, beste erritmo eta adorez ari da hazten azken denboran Egia: bere baitatik, barrutik. Kalitatezko garapen hobeagoaren bila doa, betiere gizarte osoaren partaidetza hurbilago batekin, bertatik bertakoago erabaki sozio-politikoak sustatuz.

Berek bakarrik ez, baina batez ere berek, egiatarrek, dute hitza auzogintza denen artean hezur-mamitzean.

## Bibliografia

*Liburu eta artikulu-zerrenda honek liburu honen idazketan erabilitako argitalpenen berri ematen du. Bibliografiaz arduratuak, zerrendaren osagarri bat, Un Convento en la Ciudad erdal liburuko (Dr. Camino Institutua argitara emana) bibliografian aurki dezake. Aldizkariak ere hona bildu ditugu.*

A.A.A. (1972): "Lasala y Collado, Fermín", in: *DGIPV*, s. v. –.

ACHON INSAUSTI, J. A.: *Historia de las vías de comunicación en Gipuzkoa. 2. Edad Moderna (1500-1833)*. Diputación Foral, San Sebastián, 1998.

AGUIRE SORONDO, A.: "Censo de San Sebastián de 1890", in: *BEHSS*. 1984, 331-332.

AGUIRRE SORONDO, A.: "Estudio sobre la evolución demográfica de San Sebastián en el período 1846-1981", in *BEHSS*. 1987.

ALTZAKO HISTORIA MINTEGIA: *Altza. Hautsa kenduz*. Liburutegi eta Kultur Etxeen Patronatua, Donostia, 1988.

ALVAREZ ENPARANTZA "Txillardegi", J. L.: *Antigua 1900*. Kutxa, Donostia-San Sebastián, 1992.

ALZATE, L.: *Registro de la numeración de las casas urbanas y rurales de la Ciudad de San Sebastián y su distrito, en cumplimiento de la Instrucción aprobada el 24 Febrero 1860. Concluida el mes de Abril de 1862.* (Eskuizkribua. Donostiako Udal Agiritegia. Sección D, Neg. 7, Libro 1).

ANABITARTE, B.: *Gestión del Municipio de San Sebastián (1900-1925)*. Dr. Camino, San Sebastián, 1971.

ANABITARTE, B.: *Gestión del Municipio de San Sebastián en el siglo XIX.* F. Jornet, San Sebastián, 1903.

ANTIA MUNDUATE, A.: *El Buen Pastor. De Parroquia a Catedral. 1897-1997*. Kutxa, Donostia-San Sebastián, 1998.

*Anuario [del Colegio del Sdo. Corazón de Mundaitz].*

ARBUNIES, J.: "La Universidad de Deusto en San Sebastián", in: *Sapientia mellior auro. Una visión histórica y descriptiva de la vida universitaria de Deusto*. Univ. de Deusto, Bilbao, 1995.133-149.

*Argia*. Euskal astekaria.

ARSUAGA, M.; SESE, M.: *Donostia-San Sebastián. Guía de arquitectura.* Colegio Oficial de Arquitectos, San Sebastián, 1996. 158.

ARTOLA, M. (Ed.): *Historia de Donostia-San Sebastián*. Donostia: Donostiako Udala, 2000. (Gure azterlana liburu hau agertu aurretik burutua da).

AYERBE, E.: *Donostia-San Sebastián*. San Sebastián: Sendoa Argitaldaria, 1994.

AZKUE, R.M.: *Diccionario vasco-español-francés*. Bilbao. Tours/Bilbao, 1905. s.v. "Egi".

BENGOECHEA, J.: "D. Fermín de Lasala, Duque de Mandas", in: *Euskal-Erria*. LXXXVIII, 1918, 23-32.

BERRUEZO, J.: *Cien años de vida de San Sebastián (1879-1979)*. CAM, San Sebastián, 1989.

*Boletín de Estudios Históricos de San Sebastián.* Dr. Camino Institutua, Donostia.

*Boletín Oficial del Obispado de San Sebastián* (=*BOOSS*). Donostia: Gotzaindegia.

BOMBIN FERNANDEZ, L.; BOZAS-URRUTIA, R.: *El gran libro de la pelota*. Madrid, 1972.

CAMINO, J.A.: *Historia civil-diplomático-eclesiástica anciana y moderna de la ciudad de San Sebastián*. Ayuntamiento de San Sebastián, San Sebastián, 1963.

CAÑAMERO, A.: "El desarrollo de Donostia. Geografía urbana. Espacio y población", in: Ayerbe 1994: 72-77.

CARDAVERAZ, A.: *Eusqueraren berri onac, eta ondo escribitceco, ondo iracurteco, ta ondo itzeguiteco Erreglac*. Antonio Castilla, Iruñea, 1761.

CARRERAS Y CANDI, F.: *Geografía General del País Vasco-Navarro*. A. Martín, Barcelona, s. d. [1916?].

CORTAZAR, A.: *Proyecto de ensanche de la Ciudad de San Sebastián*. San Sebastián, 1862.

CUADRA ECHAIDE, P.: *Parroquia de San Ignacio de Loyola. San Sebastián.* Caja de Ahorros Municipal, San Sebastián, 1974.

*Donostiaren fundazioaren VIII. Mendeurrena. Kongresua: 1981eko urtarrilaren 19tik 23ra*. Eusko Ikaskuntza, Donostia, 1982.

ELEJALDE ALDAMA, F.: *"Behin batean Loiolan". Pasado, presente y futuro de Loiola*. Kutxa, Donostia, 1998.

ELEJALDE ALDAMA, F.: *Loiolako San Ignazio Parrokia*. *Donostia, 1897-1997*. Donostia-San Sebastián, 1996. (Groseko Parrokiaz dihardu),

*Estadísticas del Padrón a 1-5-1996*. San Sebastián.

EUSKARA ZERBITZUA: *Euskal Irakaskuntza: Hamar urte. 1979-80 / 1989-90.* Eusko Jaurlaritza, Vitoria-Gasteiz, 1990.

EUSTAT/KULTURA SAILA: *II. Soziolinguistikazko Mapa/II Mapa Sociolingüístico*. Eusko Jaurlaritzaren Argitalpen Zerbitzu Nagusia, Vitoria-Gasteiz, 1997. (3 liburuki).

EUSTAT: *Euskadiko K. A.ko 1986ko Errolda. Emaitza estatistikoen aurrerapena*. Eusko Jaurlaritza, Vitoria-Gasteiz, 1987.

EUSTAT: *Hezkuntza eta Euskara*. Eusko Jaurlaritza, Vitoria-Gasteiz, 1993.

EUSTAT: *Hizkuntza eta Euskara. E. A.ko 1986ko Biztanleen Udal Errolda*. Eusko Jaurlaritza, Vitoria-Gasteiz, 1988.

EUSTAT: *Hizkuntza eta euskara. Euskadiko KA.ko 1986ko biztanleen Udal Errolda*. Eusko Jaurlaritza, Vitoria-Gasteiz, 1988.

FORTUN PEREZ DE CIRIZA, L.J.: “San Sebastián en el dominio del Monasterio de Leire (siglo XI-1235)”, in: *Donostiaren fundazioaren VIII. Mendeurrena. Kongresua: 1981eko urtarrilaren 19tik 23ra*. Eusko Ikaskuntza, Donostia, 1982. 451-467.

GALARRAGA, I.: “El plano de Donostia, imagen de la ciudad”, in: Ayerbe 1994.

GAZTERIA SAILA: *1996ko biztanleen Udal Erroldaren ustiaketa (eta informazio gaurkotuagoa ez dugun gaietarako, 1991ko zentsuarena)*. Donostiako Udala, Donosti, 1997. (Edizio polikopiatua).

GOENA, I.: *Proyecto de un nuevo barrio de la Estación en la ciudad de San Sebastián*. 1891. (Koldo Mitxelena Kulturunean ikus daiteke).

GOMEZ PIÑEIRO, et al. *Documentos cartográficos históricos de Gipuzkoa*. Diputación Foral de Gipuzkoa, San Sebastián, 1994.

GOMEZ PIÑEIRO, F.: *Aproximación a la geografía social y urbana de la comarca donostiarra*. Grupo Dr. Camino, San Sebastián. 1984.

GOMEZ PIÑEIRO, F.: *San Sebastián y su área periférica*. [CAP], San Sebastián, 1982.

GOROSABEL, P. *Noticias de las cosas memorables de Guipúzcoa*. La Gran Enciclopedia Vasca, Bilbao, 1972.

GOROSABEL, P.: *Diccionario histórico-geográfico... de Guipúzcoa*. Tolosa. 1862.

GRANDIO, J.: *Urbanismo y arquitectura ecléctica en San Sebastián. 1890-1910*. Caja de Ahorros Municipal, San Sebastián, 1987.

*Guía de la Iglesia en España.* Madrid, 1954. 382, 383-384.

*Guía de las comunidades de los religiosos españoles*. Confer, Madrid, 1987. 268-269.

*Guía de las comunidades de religiosas en España*. Confer, Madrid, 1988. 442-445.

*Guía de las Comunidades religiosas femeninas de España*. Madrid, $1975^3$. 378-380.

IGE: *Resultados generales del Censo de la población de España, según el empadronamiento hecho en 31 de diciembre de 1877.* Madrid. 1879.

INE: *Poblaciones de hecho de los municipios españoles, según los Censos oficiales de 1900 a 1981*. Madrid, 1987.

INE: *Poblaciones de derecho y hecho de los municipios españoles. Censo de población de 1991*. Madrid, 1992.

INTXAUSTI, J.: "Leizarraga eta Leizarragatarrak (1563-1571), Erreforma-Kontrarreformetako ilun-argitan", in: *RIEV*. XL, 1995, 119-160.

INTXAUSTI, J.: "Talde euskaltzaleen garapen historikoaz (XVI-XX. mendeak)", in: INTXAUSTI, J. (ed.) (1998): *Hizkuntzaren aldeko mugimendu sozialak*. Bilbo: EHU. 17-56.

ISASTI, L. Martínez de: C*ompendio historial de Guipúzcoa*. 1625. [I. R. Baroja, San Sebastián, 1850].

IZAGIRRE, K.: *Euskararen historia txikia Donostian. 1800-1998.* Euskararen Udal Patronatua, Donostia: 1998.

IZAGUIRRE, R.: *En torno a los orígenes de San Sebastián. El Urumea y los puertos donostiarras.* Editorial Vasconia, Pasajes de San Pedro, 1933.

IZARO, T. DE: "Recuerdos de nuestra ciudad", in: VARII (1979): *Cien años al servicio de Guipúzcoa*. Caja de Ahorros Municipal, San Sebastián: 1979.

JIMENO JURIO, J.M.: "Iglesia y euskera en Donostia (siglo XVI)", in: *Vasconia*. XXV, 1998, 227-242.

LARRAMENDI, M. de: *Corografía, o descripción de la Muy Noble y Muy Leal Provincia de Guipúzcoa*. SGEP, San Sebastián, 1969.

[LARRAÑAGA, T.] *Fraternidades Franciscanas [del territorio de la Provincia franciscana de Cantabria]*. EFA, Aránzazu, s.d.

LARRINAGA RODRIGUEZ, C.: *Actividad económica y cambio estructural en San Sebastián durante la Restauración, 1875-1914*. Kutxa, San Sebastián, 1999.

LAZCANO, P.: *Historia de San Sebastián, Altza e Intxaurrondo*. [Donostia], 1996.

MACHIMBARRENA, J.: *San Sebastián, presente y futuro*. Madrid, 1945.

MADOZ, P.: *Diccionario geográfico-estadístico-histórico de España y sus posesiones de Ultramar.* Madrid. s. v. "San Sebastián". Madrid, 1850. [Gipuzkoari dagozkionekin osatutako liburukia: *Gipuzkoa*. Foru-Aldundia, Donostia, 1991].

MAISTERRENA, A.; VIVES, G.; AGUINAGALDE, B.; ROLDAN, J.M.: "Documentación del siglo XIII del Monasterio de San Bartolomé del Camino de San Sebastián", in: *Donostiaren VIII. Mendeurrena. Kongresua*, 1982. 499-508.

MALUMBRES IBISATE, A. "Historia del Colegio [del Sdo. Corazón]", in: *Anuario del Colegio del Sagrado Corazón (Corazonistas). Curso escolar 1992-1993*. San Sebastián, s. l., 1992, 6-22.

[MALUMBRES IBISATE, A.]: "La adquisición de Mundaiz: 1955-1959", in: *Anuario. 1995-1996*. S. l., 1995. 8-17.

MALUMBRES IBISATE, A.: “40 aniversario en Mundaiz (1959-1999)”, in: *Colegio Sagrado Corazón. Mundaiz Ikastetxea. Anuario 1998-1999*. San Sebastián, 1998. 6-9.

MARTINEZ DIEZ, G.: *Guipúzcoa en los albores de su historia*. Diputación Provincial, San Sebastián, 1975.

MICHELENA, L.: *Apellidos vascos*. Ed. Txertoa, San Sebastián, 1973[3].

MITXELENA, K.: *Orotariko euskal hiztegia*. Euskaltzaindia, Bilbao, 1992. VI, 401: s. v. “hegi”.

MUGICA, S.: *Las calles de San Sebastián. Explicación de sus nombres.* Caja de Ahorros Municipal, San Sebastián, 1916.

MUGICA, S.: *Provincia de Guipúzcoa*, in: Carreras y Candi. (1916): Probintziari dagokion liburukia.

MUGICA, S.: “Los Gascones en Guipúzcoa”, in: *Homenaje a Don Carmelo de Echegaray. (Miscelánea de estudios referentes al País Vasco)*. Impr. de la Diputación, San Sebastián: 1928. 1-29.

MURUGARREN, L.: *La Catedral del Buen Pastor. San Sebastián.* Caja de Ahorros Municipal, San Sebastián, 1975.

MURUGARREN, L.: *San Sebastián - Donostia*. Caja de Ahorros Municipal, San Sebastián, 1978.

MURUGARREN, L.: *San Martín. Barrio y parroquia donostiarra. Donostiako auzune ta parrokia*. Caja de Ahorros Municipal, Donostia-San Sebastián, 1986.

MURUGARREN, L.: *Santa Katalina*. *Errebal eta portu baten kondaira laburra.* Eguisa, San Sebastián/Donostia, 1987.

MUTILOA POZA, J.M.: *Guipúzcoa en el siglo XIX*. Caja de Ahorros Provincial, San Sebastiám, 1982.

ORDOÑEZ, J.: *San Sebastián en 1761. Descripción de la ciudad, sus monumentos, usos y costumbres.* Comité de Conmemoraciones Centenarias, San Sebastián,1963 [1761].

OSTOLAZA, I.: “La organización eclesiástica guipuzcoana durante la Edad Media”, in: *Donostiaren VIII. Mendeurrena. Kongresua* 1982, 163-172.

PEÑA IBAÑEZ, J.M.: *Del San Sebastián que fue*. Banco Guipuzcoano, San Sebastián, 1999.

PIQUERO, S.: *Demografía guipuzcoana en el Antiguo Régimen*. UPV, Bilbao, 1991.

REAL ACADEMIA DE LA HISTORIA: *Diccionario geográfico-histórico de España. Sección I: Comprehende el Reyno de Navarra, Señorío de Vizcaya, y Provincias de Alava y Guipúacoa*. Vda. J. Ibarra, Madrid, 1802. S. v. “San Sebastián, ciudad”.

RODRIGUEZ SORONDO, M.C.: *Arquitectura Pública en la ciudad de San Sebastián (1813-1922)*. Caja de Ahorros Municipal, San Sebastián, 1985.

SADA, J.M.: *San Sebastián, calle a calle*. [San Sebastián], 1985.

SADA, J.M.; SADA, A.: *San Sebastián. La historia de la Ciudad a través de sus barrios, calles, plazas, montes y caminos*. Editorial Txertoa, San Sebastián, 1997.

SIADECO: *Donostiako azterketa soziolinguistikoa*. I. *Euskararen ezagupide-maila 1981eko Erroldaren* [sic] *arabera*. II. *Euskararen presentzia bizitza sozialean.* III. *Inkesta pertsonalaren emaitzak*. IV. *Eranskin estatistikoa*. 1986. (Argitaragabea).

SIADECO: *Euskara Donostian. Azterketa soziolinguistikoaren laburpena*. Euskararen Udal Patronatua, Donostia, 1986.

SILVAN, L.: *El término municipal de San Sebastián. Su evolución histórica*. Dr. Camino, San Sebastián, 1971.

SUESCUN JAUREGUI, J.M.: "Orígenes del Colegio de Mundaiz", in: *Colegio del Sagrado Corazón, Mundaiz. Anuario 1984-1985*. San Sebastián, 1984.

TELLABIDE, J.: "Txurrutala", "Astiñene eta Loiolako Zubia", "Egia eta Tturkoene", "Sibilia", "Martikotxotegi", "Mundaitz", "Mantulene", hurrenez hurren in: *Irutxulo* 1994-11-04, 29. z., 34. or.; 1994-12-30, 35. z., 33. or.; 1995-08-01, 65. z., 33. or.; 1996-05-31, 99. z., 33. or.; 1996-06-07, 100. z., 33. or; 1997-03-14, 133. z., 33. or.; 1997-04-11, 135. z., 33. or.

TELLABIDE, J.: *Donostiako toponimi erregistroa/Registro toponímico donostiarra.* Dr. Camino, Donostia, 1995.

TELLECHEA IDIGORAS, J.I.: *Santiaguistas guipuzcoanos*. Dr. Camino Institutua, Donostia, 2004. ("Domingo y Diego de Atocha. Un injerto roncalés en el San Sebastián del siglo XVII", 129-133).

UNZURRUNZAGA, X.: "La arquitectura y el urbanismo en el siglo XX", in: INTXAUSTI, J. (ed.): *Euskal Herria. Realidad y Proyecto*. San Sebastián: Jakin, 1985. 55-66.

URBANISTES ASSOCIATS: *Plan General Municipal de Ordenación de San Sebastián. Estructura y crecimiento urbano*. San Sebastián, 1978 (ed. fotokopiatua).

URBANISTES ASSOCIATS: *Plan General Municipal de Ordenación de San Sebastián*. *Base económica y asentamientos territoriales*. San Sebastián, 1978.

VARII: *Futuro urbanístico para la comarca de San Sebastián.* Colegio de Arquitectos, San Sebastián: 1980.

VARII: "La ciudad capital de Guipúzcoa y su periferia", in: *Varii: Futuro urbanístico 1980*. 1980.

VARII: *Cristina Enea*. Udala, Donostia, 1995.

*Vasconia*. Eusko Ikaskuntzako kuadernoak.